184

E. S. Dodgson (5 shillings)
29 December 1900.
(211. a. en Vinson)

There is a copy of this edition at the British Museum.
In this, those leaving the Index, and the list of errata were needlessly repeated. The pages after 484 are really XXIV. I have cut out the 4 superfluous leaves.
The Bodleian Library has a copy without index.
The copy in the British Museum has the shelfmark I.X.

Basq. 4.

Offered to the Library of the Taylor Institution by Edward Spencer Dodgson, 29 November, 1901.
prosit multis!



# JESUSEN IMITACIOCO EDO BERARI JARRAITCEÑ ERACUSTEN DUEN LIBRUBA.

*AITA KEMPIS VENERAGARRIAC ATEREA.*

*ETA*

AITA FRAI JOSÉ CRUZ DE ECHEVERRIA Zarauzco Misioneroac euscaldunen amorez, ta ayentzat modu egoquiyan euscaraz para duena.



*BEAR DIRAN LICENCIAQUIN.*

TOLOSAN: La Lamaren Alarguнaren Moldeteguian.
1829.

† VICI BEDI JESUS.

## *Iracurtzalleari itz bat.*

Ipintzen dizut escubetan, Cristau maitea, bear arimbat ecin alabatu ditequien libru bat. Badira laureun urte igaroac au aterazala, ta esan dezaquet duda gabe, escola izanic, libru onen berri jaquin duten, ta izateco era izan duten andic onarañaco Santu guztiyac onen jabe eguin dirala, ta Crtstau catolicoen nacio guztiyac ere beren itzcuntzan ipiñi dute, añ estimagarriya da *libru* au. San Ignacio gure paisano maiteac guztiz asco encargatcen zuen libru au, ta etzan bera onetzaz aprovechatu gabe guelditcen, ez bada aren vicitza escribitu zutenac dioten bezala, egunero guchiyena bi capitulo iracurtcen cituen; goicean bata, ta au izaten zan libruban bertan escribituac dauden bezala, gaur bat, ta bigar arren urreugoa. Arratsaldeco capituloa berriz iza-

tenzan, libruba iriqui, ta lembici aguertcen zana. Eta aiñ gogotic sayatu zan libru onen doctriña jarraitcia, ce Santua ezagutu zutenac esaten zuten, Jesusen imitacioco, edo berari jarraitcen eracusten duen librubaren imagiña vici bat zala. Eznituque esatez acabatuco Santuac ta jaquintsu devotoac libru onegatic esan dituzten alabanzac. Esan bear ditut orregatic ere Frai Luis de Granadaren itzac.

Dio bada Veneragarriyac libru onen gañean : *Andiac dira libru onegatic esaten diran alabanzac, ta cedorrec esperimentatu nai baldin badezu icusico dezu, ezan dan guztiya ecer ez dala, berac mereci duen alabanzaren aldean. Eguizu prueba, iracurrizazu, ta ecusico dezu, libru onen doctriñaren indarra, ta zure animarentzat gusto dezun guztiya topatuco dezu. Jaungoicoaren providenciya ezagutcen da librucho onetan, bada añ itz guchitan aimbeste gauza, personaren biotza muguitceco añ indartsuac, esaten ditu. Iracurrizazu bada libru au, ta erabillizazu zurequin orregatic bulto chiquian*

*ipiñi det, bera izango dezu lagun leyala, zure trabajuetan consueloa, zure dudetan eracustzallea, icasico dezu onetan oracioa ondo eguiteco, ta ondo vicitceco modua, baita ere ondo ilteco jaquinduriya. Artuzazu bada adisquide au, ez dezazula zugandic utci, iracurrizazu maiz, ta ez dezazula bildurric izan, onen leccioac gogoan joco zaituela; gauza batzuec berac amar bider iracurriagatic ere, beti berriyac irurituco zaizquitzu, ta icasico dezu, Jaungoicozco espirituaren izatca iñoiz agortcen ezdana dala. Artuzazu bada Jaungoicoaren ontasunac eman digun erregalo au, ta usazazu, ta gozazazu zure provechuraco.* Guztiyac dira Veneragarriyaren itzac, ta nic esaten dituran baño espiritu gueyagorequin esanac.

Nere Aita Santo Domingoren Erligioaren honra dan Veneragarri onec dion guztiya bada esperimentatcen da libru au iracurtcetic. Eta San Ignacio gure paisano guztiz maiteac ta beste ascoc esaten zuten bezala, ta neronec ere asco personi entzun dieraten bezala

libru au eroceñ lecutatic iriquitcen dan guztiyan, animac orduan premiya duena topatcen da, ta ala, ondo esanzuen esan deran Veneragarriac, animaren gaitz guztiyen contraco erremedioa dala. Onen estimagarriya izanic bada libru au, artu det euscaraz ipintceco nequea, ta ez det uste, alferric izango dala. Ez dedilla bada ez, escaldun maitèac, nic zuen amorez ártu deran nequea alferric izan, ez bada aprovecha zaitezte libru onen lecioaz: eta batequin itz eguiten derala, entzun zadazute guztiyac.

Iruquizazu, Cristau maitea, eguneroco ordu jaquin bat señalatua, capitulo bat badere libru onetan iracurtceco, ta guardazazu falta gabe ordu ura. Goiza da onetaraco egoquiena. Eta precisoco cer eguiñen batec ordu artan iracurtcia eragozten badizu, guero lembaitlen cumplizazu. Jarraizazu onetan beste ecin contaalaren artian San Ignacio escaldun guztiz maitearen, ta Guipuzcoaco honraren egemploa: baita ere arc bezala gaur capitulo bat, ta

bigar aren urrengoa iracurtcen; ezbaldin bazaitzu ere eragoxten, zure animac gueyena premiya duela, ezagutcen dezun capituloa, noiz nai iracurtcia. Bigarren: iracurtcen asi baño lenago jasozazu zure biotza Jaungoicoagana, escazayozu Espiritu Santuari, eman dizazula, iracurtcen dezunetic provechua ateratceco graciya. Ez dezu au logratuco, ascoren guisa atencio gabe corrica iracurtcen badezu. Ez bada orrela, ezbada espacioz, itz bacoitza consideratcen bezala, iracurri beardezu; ta ojala esaten dan gauza bacoitcean pisca bat consideratcen guelderatuco baciñaque, orrela erorico litzaque intza lurrera bezala, Jaungoicoaren graciya zure animara. Pensazazu onetaraco, Jaungoicoaren itza entzuten zaudela, bada berac itz eguiten digu libru santuac dirala medio. Irugarren: beti atera beardezu asmo santuren bat iracurtcen dezunetic, besteric ezbada ere, lenagoco asmo santuetan sendotceco: ta escatu humil Jaungoicoari cumplitceco graciya, bestela utsa da iracur-

tcia. Laugarren: artuzazu iracurri dezunetic gueyena conveni zaitzula iruritcen zaitzuna gogoan, zure artian consideratceco, ta premiya dezunian, artzaz baliatceco.

Cumplitzatzu bada, Cristau maitea, consejau abec, dala libru au, dala beste erroceñ libru santu iracurtcean, ta bedeicatuco zaitu zure Jaungoico guztiz onac. Eman dizazula onetaraco Jesus maitagarriyac bere graciya, baita ere nitzaz zure oracioetan noizbait acordatceco. Alcar Ceruan icusi dezagula. Amen. Ala izan dedilla, ta lembaitlen.



VICI BEDI JESUS.

# JESUSEN IMITACIOCO LEMBICICO LIBRUBA,

Ceñian ematen dira vicitza espiritualeraco conseju provechugarriac.

## 1 CAPITULOA.

*Jesusen imitacioaren, ta munduco vanidadien despreciaren gañian.*

*Niri jarraitcen dirana ez dabil illumbetan,* dio Jaungoicoac. Jesusen itzac dira abec, ceñaquin consejatcen gaitu, beraren vicitza, ta costumbreac jarraitceco, eguiyaz arguituac, ta biotce-

Atoz arren Espiritu Santua. Onela esan bear dezu viotcetic, erocen capitulo letcera zuacen bacoitzean.

tco ichutasun guztitic libre guelditu nai badegu.

Izan bedi gure estudioric andiena Jesusen vicitzan consideratcia. Jesusen doctriñàc Santuen doctriña guztiai eraguiten die, ta espiritua luqueenac, an escutatua dagoen ondasun andiya topatuco luque. Baña guertatcen dana da, ascoc Evangelioa maiz entzuten badute ere, deseo laburra sentitcen dute, cergatic Jesusen espiritua falta zaye. Nai dituenac bada guztiro, ta gustora Jesusen itzac entenditu, sayatu bear du, guztiyan Jesusen antcera vicitcera. ¿Cer valioco dizu zuri Trinidadeco misterioaren gañian gauza andiyac esatia, falta baldiñ bazaitzu humildadea, ta beragatic ofenditcen badezu Trinidadea. Ez dute eguiyaz itz andiyac persona justua, ta santua eguiten, ez bada vicitza san-

tuac. Nayago det pecatuen damua sentitu, bera cer dan jaquin baño. Jaquingo baceniluque ere Escritura Sagraduba, ta filosofoen esan guztiyac, cer valioco lizuque orrec guztiyac Jaungoicoaren amorio gabe? *Vanidade guztien vanidadea, ta gauza guztiyac vanidadea, Jaungoicoa amatciaz, ta bera bacarric servitciaz campora.* Au da jaquinduriya guztiz andiya mundua despreciatcen degula, Ceruetaco erreinora joatea.

Vanidadea da bada acabatu bear duten ondasunen ondoren ibiltcea, ta ayetan confiatcia. Vanidadea da honrac billatcia, ta estadu altura igo nai izatia. Vanidadea da araguiyaren deseoai jarraitcea, ta guero gu gogotic castigatuac izateco, motivoa izango dan gauza deseatcia. Vanidadea da luzaraco vicitza deseatcia, ta Jaungoicoaren bil-

durrian vicitciaz casoric ez eguitia. Vanidadea da mundu onetaco vicitzaz bacarric contua izatia, ta beste munducoa ona izateco, bear dana ez eguitia. Vanidadea da instante batian igarotcen dana amatcia, ta beti iraungo duen Ceruco gloriya crabazteco, aleguiña ez eguitia. Acorda zaitez maiz Escritura Sagraduan esaten dan gauza onetzaz. *Cergatic, ez da asetcen beguiya icustez, ezta ere belarriya aditcez.* Procurazazu bada munduco gaucetatic zure biotza apartatcia, ta Cerucoetan empleatcia: cergatic mundu onetaco gaucetaraco griña jarraitcen dutenac, ciquintcen dute beren conciencia, ta Jaungoicoaren graciya galtcen dute.

*Aita gurea ta Ave Maria animacgatic. Onela beti, letcera acabatu ondoan.*

## 2 CAPITULOA.

### *Bacoitzac bere buruaz humil pensatu bear duela.*

Guizonac berez jaquitia deseatcen du; baña ¿cer valiodu jaquinduriyac Jaungoicoaren bildur gabe? Obea da eguiyaz Jaungoicoa servitcen duen necazari humil bat, bere burua ezagutciaz casoric eguin gabe, Ceruco muguimentuac ezagutcen empleatcen dan filosofo soberboa baño. Ondo ezagutcen duenac bere buruba, ez du ecertan iruquitcen, ta ez da ere personen alabantzacgatic gozatcen. Munduco gauza guztiyac jaquingo banituque ere, baña ez balegoque nigan Jaungoicoaren amorioa ¿cer valioco liraque beraren aurrean, ceñac nolacoac diran obrac, ala juzgatuco nau? Utcizazu jaquin pai gueyeguiya, cergatic distrac-

cio ta engañio andia isaten da orretan. Asco gustatcen zaye jaquintsuai aintzacotzat beren burubac aguertcia, ta jaquintsuac dirala besteren abotic entzutia. Gauza asco dira, ceñac jaquitia guchi, edo batere ez dio importa animari; ta chit juicio guchi du, bere animari servitcen diozcan gaucetan ez bada, bestetan empleatcen danac. Ez dute itz ascoc anima asetcen, ez bada Jaungoicozco vicitzac alibioa ematen dio animari; eta confianza andiya Jaungoicoagan conciencia garbiyac ematen du.

Cembat eta gueyago, ta obeto daquizun, ambat eta gogoticago juzgatua izango cera Jaungoicoagandic, ez bacera beraren servicioan obeto empleatcen. Etzaitecela daquizun habilidade, edo jaquinduriagatic soberbiaz bete, ez bada bildur izanzazu eman zaitzun

graciyagatic, edo ezagüeragatic. Asco daquizula, ta ondo asco entenditcen dezula, baldiñ baderitzatzu, jaquinzazu orregatic ere, asco gueyago dirala zuc ezdaquizquitzunac. Ez dezazula pensatu nai izan, iñor baño jaquintsuagoa cerala, ezbada aitorzazu zure ez jaquiña. ¿Cergatic iruqui nai dezu zure buruba besteric baño jaquintsuagotzat, zu baño jaquintsuagoac, ta letraduagoac duda gabe asco diralaric? Valioco dizun moduan cerbait jaquin, ta icasi nai badezu, amazazu zu ez ezagutua izatia, ta ecer ecian guztiyac zu iruquitcia. Au da doctriña guztiz andiya, ta guztiz provechugarriya; bacoitzac bere burubaren eguiazco ezagüera, ta desprecioa izatia. Bere buruba ecer ecian iruquitcia, ta bestiacgatic beti ondo, ta andiro pensatcia, jaquinduriya, ta per-

feccio andiya da. Icusico bacenuque ere besteric publicoan pecatu eguiten, edo pecatu andiren batzuec eguiten, etcenuque orregatic ere ura baño obeagotzat zure buruba iruqui bear, cergatic ez daquizu noiz arteraño gauz onean iraungo dezun. Guztiyac guera argalac, baña zuc ez dezu zure buruba baño argalagotzat iñor iruqui bear.

## 3 CAPITULOA.

### *Eguiyaren doctriñaren gañian.*

Zori onecoa eguiyac, bera mediante eracusten diona; ez ichura, ta igarotcen diran vozac medio, ez bada dan bezala. Gure iritziyàc, ta gure pensatceco moduàc ascotan engañatcen gaitu, ta guchi icusten du. ¿Certaco da, jaquin ez guenituelaco Jaungoicoaren tribunalian carguric artuco etzaigun gauz

ezcutu, ta estaliyac ezagutu nayan buruba necatcia? Eroqueriya andiya da guria, bada gauza provechugarri, ta bear ditugunac utcita, guri ecer servituco ez diguten, ta caltegarriyac diran gaucetan empleatcen guera; beguiyac ditugularic, icusten ez degu. ¿Cer importa digu guri, filosofoac tratatcen dituzten genero, ta diferencien gañean dembora empleatciac? Jaungoicoaren Semeàc itz eguiten diona, seguruac ez diran iritzi modu ascotatic libratcen da. Jaungoicoaren Seme onengandic dira gauza guztiyac, ta au esaten dute gauza guztiyac, ta au da asiera, ta guri itz eguiten diguna. Ez du iñorc bera gabe ondo entenditcen. Person ura, ceñarentzat gauza guztiyac bat diran, batera guztiyac ecartcen dituen, ta batian guztiyac entenditcen dituen, onelaco

persona bada izanditeque aldacorra ez dan biotcecoa, ta Jaungoicoagan sosegu egon diteque. ¡O eguiya bera ceran Jaungoicoa! Eguinazazu zurequin bat betico amorioan. Gogoan jotcen nau ascotan asco iracurtciac, ta entzutiac, zugan topatcen da nic nai deran, ta deseadezaquedan guztiya. Issil bitez munduco jaquintsun, ta eracustzalle guztiyac, issil bitez criatura guztiyac zure vistan, ta zuc bacarric itz eguin zadazu.

Cembat eta persona bere buruarequin bat eguiñagoa, ta bere barrenean humillagoa dan, ambat eta gueyago ta gauza andiyagoac nequeric gabe entenditcen ditu, cergatic ezagutceco arguiya Jaungoicoagandic errecibitcen du. Espiritu garbiya, tolesgabea, ta gauza batian sendo dagoena, ez da distraitcen, gauza ascotan ibilliagatic,

cergatic Jaungoicoaren honraraco trabajatcen du, ta onetaraco ez diran gaucetan bere atencioa ipiñi gabe egotera, zayatcen da. ¿Cerc gueyago eragozten, ta enfadaitcitcen dizu, zure biotceco aficio mortificatu gabeac baño? Persona on, ta devotoac, eguiñ baño lenago dispontcen ditu barrenean, campotic eguin bear dituen gauzac; ta ez dute ayec arrastatcen griña gaiztoco deseoetara, ezbada beràc ayec ecartcen ditu arrazoyaren leguera. ¿Norc du bere buruba ventzutcen empeñatcen danac baño, batalla andiagoric? Eta onec izan bearluque gure eguitecoa; au da bacoitzac bere buruba ventzutcia, ta egunero bere buruba baño indarsuagoa eguitia, ta onean beti cerbait aurreratcen joatia. Mundu onetan izan ditequien perfeccio guztiyàc berequin du,

beti imperfeccioren bat, ta gure ezaguera guztiyàc illuntasunen bat beti badu. Zure buruaren ezaguera humilla vide seguruagoa da. Jaungoicoaganaco, jaquinduriaren ezagüera andiya baño. Ez da culpatu bear jaquinduriya, edo berez ona, ta Jaungoicoac ordenatu duen eroceñ gauzaren ezagüera, baña beti eman bearzayó aurrea conciencia on, ta vicitza santuari. Baña cergatic ascoc ondo viciteco baño, icasteco cuidado gueyago duten, orregatic ascotan uts eguiten dute, ta provechu guchi, edo batere ateratcen ez dute. ¡O disputac muguitceco arimbat cuidado ipiñico baluteque, vicioac quendu, ta virtuteac berenganatceco, ez liraque errietan aimbeste pecatu, ta escandalo guertatuco, ezta ere conventuetan aimbeste distraccio, ta ondo ez diran gauza.

Etzaigu ez Juicioco eguna datorrenean, cer iracurri guenuen galdetuco, ezbada cer eguin guenuen: ezta ere cer ederqui itz eguiñ guenuen, ezbada Jaungoicoaren bildur ceñ andiyan vicitu izan guiñian. Esanzadazu; ¿non dira orañ, mundubau ciranian, ta estudioetan fama andiya zutenian, zuc ondo ezagutcen cenituen guizon andi ta maisu ayec? Emen ayec izan cituzten emplco andiyac, bestec daucazquite ya, ta ez daquit ayetzaz acordatcen diran ere. Vici ciran artian, cerbait cirala ciruriten, ta ezda ya ayen gañean itz eguiten. ¡O ceñ laster igarotcen dan munduco gloriya! Ojala ayen vicitza ayen jaquinduriarequin bat izan bazan, orduan ondo estudiatu, ta iracurri izango zuten. ¡Cembat Jaungoicoaren servicioaz caso guchi eguiten dutenac, ecertaco va-

lio ez duen jaquinduriagatic galtcen diran mundu onetan! Eta cergatic humillac baño, andiyac izan nayago duten, orregatic galtcen dira beren pensamentuetan. Eguiyaz andiya da, Jaungoicoaren amorio andia duena; eguiyaz andiya da, beregan chiquiya dana, ta munduco anditasuna ecertan ez daucana; eguiyaz prudentea da, munduco gauza guztiyac gorotzatzat, edo gauza despreciagarritzat daucazquiena, Jesu Cristo erabazteagatic; ta eguiyaz jaquinsuna da, bere vorondatea utci ta, Jaungoicoarena eguiten duena.

## 4 CAPITULOA.

*Eguin bearditugun gaucetan izan beardegun prudenciaren gañean.*

Etzayo eroceñ itci, eta eroceñ barrengo muguimenturi sinisme-

na eman bear, ezbada prudenciarequin, ta cuidado andiarequin. Jaungoicoaren leguearequin bat gauzac examinatu bear dira. Gauza negargarriya da guertatcen dana, bada ascotan errazago sinisten, ta esaten degu progimoaren gaitza, ona baño, añ miserableac guera. Baña ez diote cristau virtuosoac contatcen duen eroceñi erraz sinisten, cergatic badaquite, Adanen semeen pecaturaco griña, ta itzquetan uts eguiten errazac dirala. Jaquinduriya andiya da, eguin bear diran gauzac lenago ondo beguiratcia, ta bere iritzi moduetan leyatuba ez izatia. Jaquinduri oni dagoquio ere, eroceñen itzai ez sinistea, ta sinisten, edo entzuten dana besterén belarrietara bereala ez eramatla. Consejatu zaitez persona jaquintsu, ta virtuosoarequin, ta nayago izanzazu

obeagoagandic eracutsiya izan, zure iritzia eguin baño. Vicitza virtuosoac eguiten du persona Jaungoicoaz bat jaquintsoa, ta asco gaucetan esperimentatua. Cembat eta persona beregan humillagoa, ta Jaungoicoari sugetoagoa dan, ambat eta izango da jaquintsoagoa gauza guztiyetan, ta biotz sosegatuagocoa izango da.

## 5 CAPITULOA.

### *Nola iracurri bear dan Escritura Sagraduba.*

Eguiya billatu bearda Escritura Sagraduban, ta ez jaquintsoac bezala itz eguitia. Cer fiñequin eguinzan Escritura Sagraduba, arequin berarequin guc ere iracurri beardegu. Gueyago billatu beardegu Escritura Sagraduban gure provechuba, itcen apditasuna ba-

ño. Añ gustora iracurri bearditugu libru devotoac, ta son andiya ez dutenac, nola dutenac, ta jaquinduriya andicoac. Ez dezazula beguiratu, libruba ateratcen duena, jaquinduri andi, edo guchicoa dan, ezbada eguiyaren amorioac bacarric, iracurtcera, muguitu bearzaitu. Ez dezu, norc au esan zuen, beguiratu bear, ezbada cer esaten dan. Persònac faltatcen dute, baña Jaungoicoaren eguiyac beti irauten du. Persònaz diferenciaric eguin gabe modu ascotara itz eguiten digu Jaungoicoac. Ascotan eragozten digu gure curiosidadeac, Escritura Sagraduba iracurtcetic ateraco guenuquien provechuba. Cergatic provechuba ateratciagatic iracurri baicic eguin bear ez guenuquena, esaten dana, comprenditu nayan ibiltcen guera. Atera nai badezu provechuba, ira-

currizazu humildadearequin, ta curiosidadeetan ibilli gabe. Ez dezazula ere jaquinsuaren icenic izan nai. Galdezazu gogo onez, ta entzuntcitzu issillic Santuen itzac; ez ditzatzula ere despreciatu zarren esanac cergatic, ez dira motivo gabe abotic ateratcen.

## 6 CAPITULOA.

*Arrazoyarequin ondo ez datocen aficioen gañean.*

Bear ez dan moduan gauzaren bat deseatcen duen guztiyan, bereala galtcen du personàc bere soseguba. Soberboa, ta guticiosoa iñoiz sosegu ez daude. Espirituz pobreac, ta humillac diranac, sosegu andiyan vici dira. Oraindic bear bezala beregan ill ez dan personà, laster tentatua, ta ventzutua izaten da gauza chíqui, ta despreciagarrietan. Espirituan eriya,

ta moduren batian oraindic araguizcoa dana, ta sentiduen gaucetara macurtua, gaitz apartaditeque guztiro munduco deseoetatic: orregatic ascotan triste sentida, apartatcen danian; ta erraz enfadatcenda ere, norbaitec contra eguiten badio. Eta deseatcen duena logratcen badu, bereala bere concienciac eguiten diozcan deagarraquin penatcen da, cergatic billatcenzuen paquea alcantzatceco, ecer servitcen ez duena, bere aficioz seguituzuen. Pasio, edo aficioai contra eguiñarequin bada, topatcenda biotceco eguiyazco paquea, ta ez ayei servituaz. Ezdago bada paquea oraindic araguizcoa dan personaren biotcean, ezdago sentiduen gaucetara emana dagoenaren biotcean, ezbada devocio andicoa, ta espirituala danarenean.

## 7 CAPITULOA.

### *Nola igues eguin beardegun esperanza vano, ta soberbiatic.*

Zoroa da bere confianza guizonetan, edo criaturetan ipintcen duena. Ez dezazula izan lotsaric Jesusen amorez besteai servitcean, ta mundu onetan pobre icusteaz. Ez dezazula zugan confiatu, ezbada Jaungoicoagan. Eguizu zuc zugan dana, ta prest egongo da Jaungoicoa, zure vorondate ona cumplitceco; ez dezazula ere ez zure jaquinduriyan, ta ez munduco beste personen baten habilidadean confiatu, ezbada Jaungoicoaren graciyan, ceñac humillai laguntcen die, ta beren burubaz presumitcen dutenac, humiltcen ditu. Etzaitecela ondasunetan gloriatu, baldiñ badituzu; ezta ere adisquidectan, asco aldezatequenac diralaco, ezba-

da Jaungoicoagan, ceñac guztiya ematen du, ta bere buruba gauza guztien gañ ematea, deseatcen du. Ez dezazula vanidaderic artu zure gorputzaren anditasun, edo edertasunagatic, ceñà eritasun chiqui batequin galtcen, ta itzusitcen da. Etzaitecela vanidadez alegratu dezun habilidade, edo ingenioagatic, Jaungoicoari naigaberic eman ez diozazun, ceñarena da zuc dezun on guztiya. Ez dezazula zure buruba besteac baño obeagotzat iruqui, Jaungoicoac gaiztoagotzat iruqui etzaitzan, ceñàc ondo daqui gure biotzan cer dagoen. Ez dezazula obra onacgatic vanidaderic artu, cergatic diferentiac dira guizonen juicioac, ta Jaungoicoarenac, ceñari guizonai gustatcen zayenàc, naigabea ematen dio ascotan. Baldiñ badago zugan gauza virtuosoren bat, pensatcitzu, bes-

acgatic obeagoac, orrela humil-
dean conservazaiteeen. Ez dago
lteric guztiyen azpian zu jarria-
tic, baña calte andiya da zure-
at, bat bacarra baño ere obea-
otzat zure buruba iruquitcia. Pa-
ne iraucorra du humillàc, baña
berboaren biotzan invidiya, ta
ıſadua maiz.

## 8 CAPITULOA.

### *Adisquidetasun gueyeguiya igues eguin beardala.*

*Ez diozazula eroceñ personi zure iotza aguertu, ezbada persona aquintsun, ta Jaungoicoaren bil-lurrecoarequin zure gauzac tra-atcitzu.* Persona gaste, ta cam-ootarraquin guchi tratazazu. Ez litecela aberatsacgatic zure itzac, bestela izango ez liraquien beza-acoac izan; eta persona andiyen

aurrean, etzaitecela bestien aurrean baño, pocicago aguertu. Batu zaitez humil, ta tolesgabeaquin, devoto, ta costumbre onecoaquin, ta tratatcitzu animaren provechuco gauzac. Ez dezazula emacumearen batequin adisquidetasunic izan, ezbada encomenda zayozcatzu Jaungoicoari guztiyac generalian. Jaungoicoarequin, ta bere Ainguera santuaquin bacarric adisquide izatia desçazazu, ta ez dezazula guizonengandic ezagutua izateco deseoric izan. Amorioa guztiengan izan bearda, baña adisquidetasuna ezda conveni. Ascotan guertatcen da, ezagutcen ez dan persona, bere fama onagatic chit ontzat iruquitcia, baña ezagutcian, dan baño guchiyago iruritcen da. Ascotan pensatcen degu, besteaí agradatcia, ayequin tratatuaz, baña ciguten estimacioa galtcen asitcen guera,

cergatic ditugun faltac ezagutcen dizquigute.

## 9 CAPITULOA.

*Obediencia, ta sugecioaren gañean.*

Gauza guztiz andiya da obediencian egotia, Preladuaren mendean vicitcia, ta bere burubaren jabe ez izatia. Ascoz seguruagoa da subditoa, edo aguinduba izatia, Preladuba, edo aguintaria izatia baño. Ecin bestian daude asco obedienciaren azpian, ta ez Jaungoicoaren amorioagatic. Penatubac vici dira onelacoac, ta erraz murmuratcen dute, ta ez dute animaco libertaderic izango, ez badira biotz guztitic Jaungoicoaren amorez sugetatcen. Zuaz onara, naiz ara; baña ez dezu soseguric topatuco ez baldiñ bacera humil sugetatcen aguintariaren gobiernora. Ez dago dudaric, gustorago seguitcen due-

la, bacoitzac bere iritziya, ta gueyago inclinatcen dala beràc bezala pensatcen dutenetara; baña baldin Jaungoicoa gure artian badago, preciso da paquearen amoréz, gure iritziya utcitcia. ¿Nor da ain jaquintsua, gauza guztiyac guztiro jaquin ditzaquena? Ez dezazula bada zure iritziyan gueyegui confiatu nai, ezbada nai izanzazu ere besteren iritziya guztora entzun. Zurea ona izanic ere, Jaungoicoagatic utciten badezu, ta bestiena seguitcen badezu orretatic gueyago aurreratuco dezu, cergatic ascotan entzun izan det: seguruagoa da entzun, ta errecibitcia consejua, ematia baño. Guerta diteque zure, ta bestien iritziya ona izatia, ta onelaco ocasioan bestien iritziya seguitu nai ez izatia, arrazoyac, edo motivo justuac ala escatcen duenian, so-

berboaren, ta setatiyaren señalea da.

## 10 CAPITULOA.

### *Itz gueyegui eguitetic apartatu bear degula.*

Aparta zaitez aleguiñ guztiya conversacioetatic, cergatic asco eragozten du animaren aurreratcea, edo virtutiètan aprovechatcia, munduco gauzac tratatciac, intencio onarequin tratatuagatie, cergatic laster vanidadeac ciquinatcen, ta bere menderatcen gaitu. Nayago nuque ascotan issillic egon izan banitz, ta personen artian egondu izan ez banitz. ¿Baña cergatic añ gustora itz eguiten degu, ta alcarrequin conversacioan egoten guera, guchitan animaco calte gabe gure baçarrera, edo issillic egotera, biurtcen guerala? Onen motivoa da, cergatic alcarren con-

versacioarequin bata bestea con-solatcia billatcen degu, ta pensamentu modu ascorequin necatua dagoen biotza aguertcia, deseatcen degu. Eta chit asco gustatcen zaigu amatcen ditugun, edo deseatcen ditugun, edo gure contracoac diran gaucen gañean itz eguitea, ta pensatcia. Baña ay! ascotan provechu gabe, ta alferric, cergatic campotic datorren consuelo onec ez dio calte guchi eguiten barrengo, ta jaungoicozco consueloari: orregatic eguin bear degu bela; ta oracioa, dembora alferric igaro ez dedin. Libre, ta conveni bada itz eguitia, animaren provechuco gauzac esantcitzà. Usario gaiatoac, ta virtutietan aurreratceco cuidadoaren faltac asco laguntcen du, gure mingaña ez guardatcero. Baña ez du guchi laguntcen animaren provechurac

co, gauza espiritualen gañean itz eguitiac, batez ere vorondate, ta espiritu batecoac Jaungoicoagan, alcarrequin batatcen diranian.

## 11 CAPITULOA.

*Nola animaco paquea alcantzatcen dan, ta Jaungoicoaren servicioan aprovechatceco deseoaren gañean.*

Paque andiya izan guenezaque; besteren esan, ta eguin, gure contucoac ez diranaquin, ocupatu izan nai ez baguenduque. ¿Nola izan dezaque lluzaro biotceco paquea, besteren cuidadoetan nastutcen danac guchi, edo guchitan bere barrenera biltcen danac, ta campotic ocasioac billatcen dituenac? Zori onecoac ecertarado ez baliraque bezala, ecertan sartu gabe nai diranac, cergatic paque asco

izango dute. ¿Cergatic santu asco añ perfectoac, ta contemplativoac, edo Jaungoicoagan arguitasun andiyarequin beti pensatcen egoten ciranac izan ciran? Cergatic mundnco deseo guztietatic beren burubac mortificatcera sayatcen ciran, ta orregatic biotz guztitic Jaungoicoarequin bat eguin, ta berengan libertadearequin ocupatu citezquien. Gu gueyago ocupatcen guera gure pasioaquin, ta acabatuco diran gaucen cuidado gueyegui degu. Guchitan ere vicio bat perfeccioarequin ventzucen degu, ta ez guera irazaquitcen, egunero virtutian aurreratceco deseoan, ta orregatic otzac, eta epelac guelditcen guera. Gure burubarentzat bear bezala illac baguenndeque, ta barrenean bear ez diran cuidadoetatic apartatuac, orduan gusta guintzaque jaungoicozco

gauzac, ta Ceruco contemplaciotic cerbait esperimenta guenezaque. Guztiya da, cergatic ez gaude libre gure griña, ta deseo gaiztoetatic, ta ez diogu Santuen videari bear bezala equiten. Nequeren bat guertatcen zaigunian ere, bereala animoa galtcen degu, ta munduco consueloen billa asitcen guera. Gogortuco baguiñaque persona virtuosoac bezala, animaco batallan sendo egoteco, duda gabe Jaungoicoac Cerutic lagunduco liguque, cegatic prest dago, beragatic peleatcen dutenai, ta beraren graciyan esperatcen dutenai laguntceco; baba ez dizquigu bestegatic billatcen peleatceco ocasioac, ezbada gu vitoriosoac ateratciagatic. Campoco, edo aguerico gauzcen cumplimentuan bacarric ipintcen badegu Ceruco videan aurreratcia, laster acabatuco da gure

devocioa. Ipiñi dezagun asscora sustrayan, au da gure griña, ta deseo gaiztoac mortificatceco aléguiña eguin dezagun, orrela animaco paquea alcanza dezagun.

Urtero vició bat gugandic quenduco baguenuque, laster virtutian cabalac, edo perfectoac eguingo guiñaque. Baña contrara guertatcen da, ascotan ezagutcen degu, obeagoac guiñala convertitu guiñan lembicico ayetan, andic urte ascoren cabuan baño. Gure devocioac, ta Ceruco videan aurreratceac gueituàz joan bear luque egunero; baña orañ gauza anditzat daucagu lembicico devocioaren parte bat ere iruqui al izatea. Lembician indar piscabat eguingo baguenuque, guero guztiya erraz, ta gustora eguingo guenuque. Neque andiya da, lenago usatcen diran gauzac uzteitcia, baña andia-

goa da, bacoitzac bere voronda- tearen; contra eguitia. Baña ez badituzu chiquigarc, ta errazac ventzutcen, noiz ventzütueco dituzu gaitzagoac? Zure griña, edo inclinacio gaiztoari lembician contra eguiozu, neque gueyagoren ez- carri etzaitzan. ¡Ay baldiñ pensatuco bacenuque, cembat animaco paque zuretzat, ta cembat consuelo bestientzat izango litzaquien, Jaungoicoaren bildur andicoä izatera zu sayatu ezquero, uste dat, cuidado gueyago ipiñico cenuquela orretan, edo animaren aurrera- tcean.

## 12 CAPITULOA.

*Neque ta persecucioetatic datorren provechuaren gañean.*

Asco conveni zaigu nequeren batzuec noizbait etortcia, cergatic bere biotcera deitceu dute perso-

nà, ezagutcen duelaco, destierroan dagoela mundu onetan, ta bere esperanza mundu onetaco gaucetan ipiñi ez dezan. Conveni zaigu ere persecucioren batzuec noiz bait izatia, ta gugatic besteac gaizqui pensatcia, guc ondo eguiten badegu ere, ta intencio ona baldiñ badegu ere. Gauza abec ascótan laguntcen dute humildaderaco, ta vanagloriatic guardatcen gaituzte: cergatic obeto billatcen degu barrengo testigúa dan Jaungoicoa, campotic guizonengandic despreciatuac gueranian, ta guizònac sinismenic ematen ez digutenian. Orregatic bearluque personàc guztiro Jaungoicoagan jarri, mundùco consuelo ascoren billa ibilli bearric ez izateco. Jaungoicoaren bildurreco personà, penatua, tentatua, ta pensamentu gaiztoaquin afligitua danian, orduan ezagu-

tcen du Jaungoicoaren ceñ bear dan, ceña gabe gauz onic ecin duela, ezagutcen du. Orduan enfadatcen du viciza luciac, ta eriotza etortcia deseatcen du, mundu onetatic irten ta Jesu Cristorequin vicitceco. Ondo ezagutceu ere du orduan, ecin munduban izan ditequela seguridade perfectoric, ta paque osoric.

## 13 CAPITULOA.

*Nola tentacioai contra eguin bear diegun.*

Mundu onetan vici gueran bitartian, neque, ta tentacio gabe eciñ izan gaitezque; cergatic Job santuae esaten zuen bezala, tentacioa da guizonaren vicitza mundu onetan. Au onela izanic bada, cuidado andiya izan bear du bacoitzac tentacioeu gañean, ta ez

dio oracioari utci bear, topatu ez dezan engañiatceco lecuric deabruac, ceñàc ez du iñoiz loric eguiten, ezbada inguruan dabil, nor tragaturo duen billa. Ez da iñor añ perfecto, ta santuric, noiz bait tentacioac ez dituenic, ta ez da posible ayec gabe guztiro egotia. Orregatic ere, tentacioac enfadagarriyac izanagatic ere, chit provechugarriyac dira ascotan personarentzat, cergatic humilteen, ta garbitcen dute, ta eguiten da ere jaquintsoa ayec dirala medio. Santu guztiyac neque, ta tentacio ascotatic igaro ciran, ta animan aurreratu ciran. Eta tentacioac sufritceco indarric izan etzutenac, betico zori gaiztocoac eguin ciran, ta galdu ciran. Ez da religio añ santuric, ta lecu añ escuturic, ceñian tentacioric, ta nai gaberic ezdan. Ez dago personà vici dan

artian tentacioetatic guatiro libre, cergatic gurequin dapcagu tentacioen sustraya, amaren sabelean sortu guiñan ezqueroztic. Tentacio, edo nai gabe bat apartatu orduco, beste bat dator, ta beti izango degu cerbait padecitceco, cergatic galdu guenuen gure zori ona. Asco tentacioen iguesi ibiltcen dira, ta gogoticago ayetan beren burubac icusten dituzte. Igues eguin nai utsarequin ecin ayetatic aparta gaitezque, ez bada, paciencia, ta humildadea mediante, etsai guztiae baño indartsuagoac eguiten guera. Assaletic, edo campotic bacarric tentaciotic apartatcen danac, eta sustraya quentcen ez duenac guchi aurreratuco du, ta aurreratu bearrean, lenago biurtuco zayozca tentacioac, ta gaizquiyago icusico du bere buruba. Soseguz, ta paciencia me-

diante animo andiyarequin Jaungoicoa lagun dezula, obeto ventzutuco dituzu, gogortasun, ta enfadoarequin baño. Artuzazu maiz consejuá tentacioco demboran, ta tentacioren batequin dagoena, ez dezazula gogor tratatu, ez bada emayozu aldezun consueloa, zuri besteac ematia naico cenuquien bezala. Tentacio gaizto guztiyen asiera biotz aldacorra, ta Jaungoicoaganaco confianza laburra da; cergatic nola ontciya, norc gobernaturic ez duenian, alde batera, tá bestera bágac erabiltcen duten, ala Jaungoicoaren servicioan lasaitcen dana, modu ascotara tentatua izaten da. Subac burniya probatcen du, ta tentacioac personà justuà. Ascotan ez daquigu cer aldezaquegun; baña tentacioac aguertcen du, cer gueran. Cuidado andiya izan bear da

orregatic ere, batez ere tentacioaren asieran, cergatic errazago etsaya ventzutcen da, animaco atean sartcen iñolaz utcitcen etzayonian, ezbada atetic campora deitcen duenian, bereala contra eguiten zayonian. Orregatic esan zuen batec; Asierai contra eguiezu, cergatic berandu dator erremedioa llaga zartu ezquero: cergatic lembician etortcen da burura pensamentu utsa, guero imaginacio sendoa, onen urrena gusto, mugimentu, ta consentimentu gaiztoa, ta onela piscaca piscaca sartcen da guztiro etsay gaistoa, asieran contra eguiten etzayonian: eta cembat eta gueyago naguitcen dan personà, tentacioai contra eguiteco, ambat eta beragan indar guchiyagocoa eguiten da, ta etsaya aren contra indarsoagoa.

Asco convertitcen diran lembi-

tico artan, padecitcen dituzte tentacio andiagoac, beste ascoc azquenian, ta beste ascoc berriz cuasic vicitza guztiyan. Batzuec ez dira chit tentatuac izaten; Jaungoicoaren vorondate justua nola dan, ceñàc personen estadu, ta merecimentuai beguiratcen die, ta bere escogituen oneraco guztiya dispontcen du; orregatic ez degu desesperatu bear, tentatuac gueranian, ez bada ambat gogoticago Jaungoicoàri erregutu bear diogu, arren gure neque guztiyetan lagundizagula, ceñàc duda gabe, San Pabloc dion bezala, emango digu tentacioa ventzuteco, graciya. Humildu ditzagun bada gure animac Jaungoicoaren escubaren azpiyàn tentacio, ta neque guztiyetan, cergatic espirituz humillac dirànac salvatu, ta audiyac eguingo ditu. Tentacio, ta nequectan eza-

gutcen da cembat aprovechatcen duen bacoitzac, ta an dago merecimentu gueyago, ta virtutea obeto ezagutcen da. Ez da gauza andiya, tentació, ta nequeric ez danian, personà devotoa izatia, baña nequeren bat guertatcen zayonian, pacienciarequin sufritcen badu, aurreratce andiyaren esperanza izango da. Ascoc tentacio andiyac ventzutcen dituzte, ta eguneroco chiquietan ventzutuac izaten dira ascotan, orrela humillatuac dirala iñoiz gauza andietan beren burubaz confiatu ez dezaten, gauza añ ecer ecetan añ argalac diran ezquero.

## 14 CAPITULOA.

*Ez dezagula iñor juzgatu.*

Cere burubagana beguiyac biurtcitzu, ta utcizayozu, besteren o-

brac juzgatciari. Personà, besteac juzgatcen, alferric necatcen da, gueyagotan uts eguiten du, ta erraz pecatu eguiten du: baña bere buruba juzgatcen, ta esaminatcen beti provechuarequin necatcen da. Nola amatcen degun gauza ala artzaz maiz juzgatcen degu, ta beragatic ascotan uts eguiten degu gure juzguetan. Jaungoicoa baldiñ balitzaque gure deseo bacarra, ez guiñaque añ erraz ichutuco gure sentiduac dirala motivo. Baña ascotan barrenen cerbait escutatcen da, edo campotic ere cerbait sortcen da, gure biotza beregana tiratcen duena. Asco beren provechuaren amorioagatic empleatcen dira asco gaucetan, berac Jaungoicoagatic edo progimoagatic empleatcen dirala uste izaten badute ere. Iruritcen zaye ere paque onean daudela,

beren gustora, ta berac pensatcen zuten moduan gauzac eguiten diranian: baña ayec deseatcen duten moduan eguiten ez badira, laster muguitcen, ta tristatcen dira. Iritzi, ta pensatce modu diferentiac dirala motivo chit ascotan sortcen dira amorioaren faltac adisquideetan, Erriyetan, erligiosó, ta devotoetan. Oitura zarra gaitz utcitcen da, ta ezda iñor bere iritzicoac ez diran gaucetara gustora eramaten. Jesu Cristoc eracutsi zuen humildadean baño, zure arrazoyan, ta habilidadean gueyago confiatcen badezu, guchitan, ta berandu izango cera Jaungoicoagandic arguitua: cergatic Jaungoicoac, gu berari guztiro sugetatcia, nai du, ta beraren amorioan irazaquiric, gure iritziyaz aztutcia.

## 15 CAPITULOA.

### *Jaungoicoaren, ta progimoaren amoriotic sortcen diran obren gañean.*

Ez da mundu guztiagatic, ta munduco persona guztiyen amorioagatic gauza gaiztoric iñoiz eguin bear, baña premiya duenaren provechuagatic, utci bearda ascotan obra onen bat eguitia, edo obeagoan aldatu bear da, ta ez da orregatic obra ona galtcen, ezbada obeagoan trucatcen da. Amorio gabeco obrác ez du ecer valio, ta amoriotic sortcen dan guztiya, dan chiquiena, ta despreciagarriena izanagatic ere, provechugarria eguiten da guztiya: cergatic gueyago beguiratcen du Jaungoicoac, cer amorioarequin bacoitzac eguiten duen, cembat, eta cer obra eguiten duen baño. Asco eguiten

du, asco amatcen duenac; asco eguiten du, gauza ondo eguiten duenac, ta ondo eguiten du, bere vorondateari baño, comunidade, edo guztiyen vorondateari gueyago servitcen dionac. Jaungoicoagandic sortcen dan amorioa dirurí ascotan, ta ez da gure burubaren amorioa baicic, cergatic jatorrizco griñac, vorondate propioaç, sariyaren esperanzac, ta gure conveniençiaren deseoac guchitan faltatu nai izaten dute. Amorio eguiyazco, ta perfectoa duenac, ez du bere burubaren provechua, edo interesa billatcen, ezbada bacarric Jaungoiçoa gauza guztiyetan honratua, ta glorificatua izatia, deseatcen du. Ez dio ere iñori invidiaric, cergatic ez du deseatcen consuelo particularric; ez du bere personan gozatu nai, ezbada Jaungoicoagan bacarric zori oñecoa iza-

tia, deseo du. Ez dio munduco criaturetatic bati ere gauza onic egozten ezbada guztiya Jaungoicoari, ceñ gandic asiera guztien asieratic guztiyac datoz, ta ceñian azquenian Santu guztiyac, bera gozatcen dutela, descantsatcen dira. ¡O ceñec leucaquen eguiyazco amorioaren chingar bat! Eguiyaz ezagutuco luque, munduco gauza guztiyac vanidadez beteac daudela.

## 16 CAPITULOA.

*Besteren faltac sufritu bear dirala.*

Personàc beregan, ta bestietan ecin erremediatu dezaquena sufritu bear du, Jaungoicoac beste modutan disponitu artian. Pensazazu, obe dala venturaz orrela zure prueba, ta pacienciaraco, ceña gabe gure merecimentuac balio ez dute. Eguin bear dezu orregatic

ere oracióa orrelaco eragozqueta, ta impedimentuagatic, pacienciaz eramateco graciya, Jaungoicoac eman dizazun. Duen faltan emendatceco progimoarì beñ, edo bì bider consejatu ezquero, ez bada emendatcen, etzaiteccla arequin gueyago necatu, ez bada Jaungoicoaren escubetan guztiya utcizazu, beraren vorondatea, ta honra beraren servitzariyetan cumplidedin, ceñàc ondo daqui gauza gaizto guztiyac onean biurtcen. Sayazaitez progimoen faltac, ta animaco eritasunac pacienciaz eramatera, cergatic zuc ere besteac cer sufritu asco dezu. Ecin eguin bacera ceori deseo dezun bezalacoa; ¿nola besteac zure guztora iruqui alditzaquezu? Besteac perfectoac izatia nai degu, ta orregatic ere gue guerea faltac emendatcen ez ditugu.

Nai degu besteac gogotic errerprendituac izatia, ta ez degu nai gu iñorc erreprenditcia: etzaigu gustatcen besteai ematen zayen arimbat libertade ematia, ta orregatic ere ez degu, escatcen deguna guri ucatcia nai: nai degu besteac aguintceaquin estutuac izatia, ta guc eciñ iñolaz ere sufritu degu, gure faltac utcitceco, gueyago estutuac izatia. Onela bada agueriyan dago, ceñ guchitan gure burubari bezala, progimoari beguiratcen diogun. Guztiyac perfectoac baldiñ baliraque, ¿cer izango guenuque orduan Jaungoicoaren amoréz cer sufritu bestiengandic? Baña Jaungoicoac orañ ala nai izan du, icasi dezagun, batac bestearen cargac eramaten, cergatic ez da iñor faltaric gabe, ez da iñor cargaric gabe, ez da iñor bere burubarentzat arimbat, ta

ez da iñor beretzat bear arimbat jaquiutsua, ezbada alcar eraman bear degu, alcar consolatu bear degu, ta orobat alcarri lagundu, eracutsi, ta consejatu. Obeto ezagutcen da, cer virtute duen bacoitzac, neque, edo naigaberen bat izaten duenian; cergatic ocasioac ez dute personà argala eguiten, ezbada nolacoa dan aguertcen dute.

## 17 CAPITULOA.

### *Religioan cer modutan vici bear dan.*

Preciso da, zure vorondatea, ta zure iritziya asco gaucetan ucatcia, paquean, ta amorioan besteaquin vici nai badezu. Ez da gauza chiquiya Conventuetan, ta ascoren compañian vici, ta quejaric gabe alcarrequin tratatcia, ta eriotzaraño leyalqui irautia. Zori onecoa

an ondo viçitu zana, ta ondo acabatu zuena. Nai badezu ondo egon, ta aprovechatu, pensa zaitez desterratua, ta erbesteroa mundu onetan. Conveni zaitzu, Jesusen amorez simple eguitea, eguiyazco erligiosoa izan nai badezu. Habituac, ta coroac guchi laguntcen dute; oitura ònac, ta griña gaiztoen bear bezalaco mortificacioac eguiten dute persona eguiyazco erligiosoa. Jaungoicoa, ta bere animaren salvacioa ez bada beste gauzaric billatcen duenac, ez du nequea, ta pena baicic topatuco. Guztiyetan chiquiyena, ta guztiyen sujeto egotera sayatcen ez danac ere, ecin luzaro paquean iraun dezaque. Servitcera etorri ciñan, ta ez gobernatcera, padecitcera, ta trabajatcera, etorria cerala, jaquinzazu, ta ez alferque-

riyan, edo berriquetan egotera. Emen probatcen dira bada persoñac urrea labean bezala. Emen ñor ecin egon diteque, ez baldin badu biotz guztitic humillatu nai.

## 18 CAPITULOA.

*Santuen egemploen gañean.*

Consideratcitzu, eguiyazco perfeccioa, ta erligioa ederqui aguertu zan, Santuen egemplo andiyac, ta icusico dezu, ceñ guchi, ta alde aldean ecer ez dan guc eguiten deguña. ¡O Jauna! ¿Cer da gure vici modua ayenarequin comparatu ezquero? Santu, ta Jesusen adisquideac servitu zuten Jaungoicoa gosian, ta egarriyan, otzan, ta estalqui guchiyan, lò guchi, ta baraubetan, oracio, ta consideracio santuetan, persecucio, ta desprecio ascotan. ¡O, cembat neque,

ta ceñ andiyac padecitu cituzten' Apostoloac, Martiriyac, Confesoreac, Virgiñac, ta Jesu Cristoren pausoac jarraitu nai izan cituzten beste guztiyac; cergatic gorrotatcen cituzten mundu onetan bere burubac, bestean zori onecoac izatiagatic. ¡O ceñ vicitza mortificatu, ta erretiratua Eremutar Santuac eremuetan eguiñ zuten! ¡Ceñ dembora luceco tentacioac, ta ceñ gogorrac sufritu izan cituzten! ¡Cembat bider deabruagandic penatuac izan ciran! ¡Ceñ maiz, ta cer devocio andico oracioac Jaungoicoari escañi ciozcaten! ¡Cer devocio andiya, virtutietan aurreratceco, izan zuten! ¡Cer mortificacio andiyac janean, ta edanean eguncro eguin cituzten! ¡Ceñ guerra andiya viciocn contra eguin zuten! ¡Cer intencio zucen, ta garbiya Jaungoicoagananaco izan zuten!

Egunez bearrean aritcen ciran, ta gabac oracio lucietan igarotcen cituzten: bearrean aricirala ere, Ceruco gauzac consideratcen egoten ciran. Dembora guztiya animarentzat aprovechatcen zuten; laburrà iruritcen citzayen egun guztiya, oracioan Jaungoicoarequin egoteco: ta Jaungoicoaren gauzac consideratcen sentitcen zuten consuelo andiyaren poderioz, aztutcen ciran jan bearraz: ondasun guztiyac, empleo andi, honra, adisquide, ta aide guztiyac utcitcen cituzten; etzuten munduco gauzaric batere deseatcen, vicitceco bear zutena doy doya artcen zuten, pena ematen cien; oraindic premiyan ere gorputzari servitu bearrac. Munduco ondasunaz pobreac ciran bada, baña chit aberatsac graciyan, ta virtutietan. Campotic premiya izaten zuten,

baña barrendic Jaungoicoaren graciya, ta consueloaquin mantentcen ciran. Munduac ayequin ez zuen contatcen; baña bai Jaungoicoac, ta bere adisquide andiyaquin bezala tratatcen zuen. Berai ecer ez cirala iruritcen citzayen; ta munduari, gauza despreciagarriyac cirala, baña Jaungoiçoaren beguiyetan valio andicoac, ta estimatuac ciran. Eguiyaz humillac izan ciran, ichu ichuan bereala obeditcen zuten, amorio, ta paciencia andicoac, ta orregatic eguncro espirituan aurreratcen ciran, ta Jaungoicoagan graciya andiya iristen zuten. Onelaco Santuac, guztiyen, ta batez ere erligioan vici diranen egemploraco, Jaungoicoac ipiñi cituen, ta gueyago muguitu bear gaituzte abec, virtutietan aurreratceco, Jaungoicoaren servicioan epelac diranac, be-

raren servicioan lasaitceco baño! ¡O ceñ deseo irazaquiya, Jaungoicoa servitceco, izan zan Erligioso guztiyena, ayen Ordena fundatu, edo asizan lembicieo ayetan! ¡Oracioaren ceñ devocio andiya! ¡Ceñ empeño andiya virtuteraco! ¡Ceñ ondo cumplitcen ciran erreglac! ¡Ceñ errespeto, ta obediencia andiya Aguintariai! Utci cituzten señaleac ematen dute oraindic aditcera, eguiyaz santuac, ta perfectoac izan cirala, añ gogotic Ceruco videan peleatu, ta mundua ventzutu zutenac. Oraiñ Erligioso anditzat juzgatcen da, erreglan faltatcen ez duena, ta bere vorondatez artu zuena, pacienciarequin sufri dezaquena. ¡O gure estaduco epeltasun, ta naguitasuna! Añ laster apartatcen guera lembicico desco irazaquitic, ta vicitciac ere enfadatcen du bat, epeltasun, ta

naguitasunaren poderioz. Ojala Cristau maitea, ez balitzaque guztiro zugan acabatu virtutietan aprovechatceco deseoa, francotan bada icusi dituzu devotoen ejemploac.

## 19 CAPITULOA.

### *Erligioso onaren egercicioen gañean.*

Erligioso onaren vicitzac virtutez jantciya izan bear du, personen beguiyetan campotic dirurien bezalacoa, barrendic izan dedin. Eta arrazoyarequin izan bear du asco gueyago barrendic, campotic icusten dan baño, cergatic Jaungoicoa da guri beguiratcen diguna, ceña ecin gueyagoraño erreverenciatu bear degu, nai degun lecuban egon gaitcela, ta Ainguerua̋c bezala garbiyac beraren vistan ibilli bear degu. Jaungoicoa servitcen,

gaur lembicico asico baldin baguiñaque bezala, eguncro gure propositoac berritu, ta virtutietan aurreratcera muguitu bear guera; ta esan bear degu: Lagun zadazu, Jauna, proposito onean, ta zure servicioan, ta eman zadazu gaur bertan, zu perfeccioarequin servitceco, graciya, cergatic oraindañio eguin derana ecer ez da. Nolacoa dan gure propositoa, alacoa izaugo da gure virtutietan aurreratcea, ta cuidado andiya bear du, ondo aprovechatu nai duenac. Asmo sendoac artcen dituenàc ere ascotan faltatcen badu ¿cer eguingo du guchitan, edo deseo andiyarequin propontcen ez duenac? Modu ascotan guertatcen da guc gure propositoac utcitcia, ta costumbratceu diran egercicio santuetatic chiqui bat ere utcitciac, beti ecartcen dio calteren bat vir-

lutian aurreratceco asmoari. Justuen propositoen irautea beren jaquinduriyan baño, Jaungoicoaren graciyan gueyago dago, ceñian ere asitcen duten guztiya, confiatcen dute; cergatic personàc propontcen du, ta Jaungoicoac dispontcen du; ta ez dago personaren escuban bere videa. Utcitcen badu noizbait personàc, progimoaren caridadean empleatciagatic, costumbratcen duen obra onen bat eguitia, erraz guero artara biurtuco da, baña gogoaren faltaz, edo naguiqueriyaz utcitcen badu, ez du falta guchi orretan, ta caltea izango du.

Eguin dezagun aleguiña, gure propositoac cumplitceco, ta orrela ere, erraz faltatuco degu gauza ascotan. Baña beti gauza jaquin, edo particularren bat cumplitcia, erabaqui bear degu, ta batez ere

virtutietan aurreratcia, gueyena eragozten diguna, ventzutcia. Gure barreneco, ta campoco gauza guztiyac ondo beguiratu, ta disponitu bear ditugu, cergatic biyac conveni dira virtutian aurreratceco. Ecin beti zure barrenera bildu bacera, sayazaitez goicean, ta arratsean badere. Goician eguin citzu zure propositoac, arratsean examina zaitez, nolacoa izan ceran egun artan, itzetan, obretan, ta pensamentuetan, cergatic gauza abetan gueyago nosqui ofenditu dezu Jaungoicoa, ta progimoa. Arma zaitez guizon indertsu bat bezala deabruaren contra: ventzuzazu gula, ta orrela araguiyaren griña gaiztoac errazago ventzutuco dituzu. Etzaitecela iñoiz guztiro gueldiric egon, ezbada edo iracurtcen, edo escribitcen, edo errezatcen, edo consideratcen, edo guztiyen

provechuraco cerbait eguiten. Orregatic ere gorputz lanac prudenciárequin eguin bear dira, ta ez dituzte ere guztiyac berdiñ artu bear.

Egercicio regularrac ez diranac, edo besteac ere comunqui eguiten ez dituztenác, ez dira publicoan, édo agueriyan eguin bear, ezbada escutuan, cergatic orrela vanidade, ta beste gauza ascotatic seguruago eguiten dira. Contu orregatic ere, guztiyai eguitia tocatcen zayen obra onetaraco naguiya, ta zure devocio particularretaraco viciya izan etzaitecen; ezbadà bear diranac, ta eguitia aguindu zaizquitzunac lembici osorò, ta ondo cumplitu bear dituzu, ta guero sobratcen bazaitzu demboraric, eguizquitzu nai dituzun devocioac. Ecin guztiyac devocio modu batian emplea ditezque, ez bada batac

oni, ta bestoac ari gueyago servitcen dio. Dembora batian ere devocio modu bat, ta bestean bestea conveni da; cergatic batzuec conveniyago dira jai egunetan, ta besteac aste egunetan. Tentacio demboran batzuen bear guera, ta paquean gaudenian, edo tentacioric ez degunian, bestien. Triste gaudenian, gauza batzuec pensatcia conveni da, ta besteac, Jaungoicoagan alegre gaudenian.

Jai principaletan berritu bear ditugu gure egercicio santuac, ta santuen laguntza gogoticago escatu bear degu. Jayetic jayera asmo onac artu bear ditugu, orduanchen mundu onetatic irten, ta Ceruco pestara allegatu bear baldin baguenuque bezala. Ta orregatic cuidado audiyarequin prestatu bear degu egun santuetan, ta devocio gueyagoan empleatu,

ta gure obligacioac gogoticago cumplitu, orrela gure nequeen sariya Jaungoicoagandic laster errecibitceco bezala. Eta au cumplitcia Jaungoicoac luzatcen badigu, sinisdezagun, ez gaudela oraindic ondo prestatuac, ta ez degula oraindic mereci gloriya añ audiya, ceña emango digu Jaungoicoac, señalatua daucan demboran; ta saya gaitecen bitartian, mundu onetatic irteteco, obeto prestatcera. *Zori onecoa (dio Jesusec) Jaunac datorrenian, velan topatcen duen bere servitzariya; eguiyaz esaten dizutet, bere ondasun guztiyen gañ ipiñico duela.*

## 20 CAPITULOA.

### *Soledade, edo bacartasunaren gañean.*

Artuzazu conveni dan dembora, zure animari beguiratceco, ta Jaun-

goicoaren mesedeen gañean maiz considerazazu. Utcitzatzu ecer servitcen ez duten gauzac. Zure buruba ocupatu baño, pecatuen damura gueyago muguituco zaituzten gauzac iracurritzatzu. Conversacio, ta ibillera alferretatic, ta novedadeac, edo berriyac entzutetic apartatcen bacera, topatuco dezu bear arimbat dembora, ta egoquiya, consideracio santuetan egoteco. Santuric andiyenac persònen conversacioetatic altzuten guztiya apartatcen ciran, ta beren bacarrian Jaungoicoarequin vicitcera sayatcen ciran. Esan zuen batec: guizonaquin egondu nintzan guztiyan, guizonaren izatean guchituric ayen artetic atera nintzan. Bear baño gueyagotan esperimentatcen degu au, ayequin luzaro itzquetan egoten gueranian. Errazàgo da batere itcic eguiñ

gabe egotia, itzquetan asita, utsic ez eguitia baño. Errazago da e-chean gorderic egotia, campoan bear bezala guardatcia baño. Nai duenac bada gauza espiritualetara allegatu, apartatu bear du Jesu-sequiñ batian gende tartetic. Ez da agueriyan, Jaungoicoa ofenditceco peligro guchirequin, iñor aguer-tcen, ezbada ezcutuan gustora e-goten dana. Ez du iñorc seguru itz eguiten, ezbada gustora issillic egoten danàc. Ezda iñor bear be-zalaco aguintariya, ez bada ondo obeditcen icasi zuena. Ezda iñor ondo gozatcen, ezbada concienciya onaren testimonioa berequin dau-canà. Orregatic ere Santuen se-guridadea Jaungoicoaren bildurrez betea egondu zan beti; ta virtute, ta graciya andicoac izanagatic ere, etciran cuidado guchiyagocoac i-zan, ezta ere humildade guchiya-

bere conciencia! ¡Ay baldin ecer servitcen ez duten cuidadoac utcico balituque, ta bacarric animarentzat provechugarriyac, ta jaungoicozco gauzac pensatuco balituque, ta bere esperanza guztiya Jaungoicoagan ipiñico baluque, cer paque, ta sosegu andiyan vicico litzaquien! Ez du mereci Ceruco consueloric, pecatuen damuan lembici empleatcen ez danac, ta ondo alere. Nai baldin badezu biotz guztitic zure pecatuen damua sentitu, sartu zaitez zure bacarrean, ta apartatcitzu zugandic munduco bullac: escribitua dagoen bezala[1]: *Zuen guelàtan damutu zaitezte.* Celdan, edo guelan topatuco dezu campoan ascotan galduco dezuna. Celda, maiz guardatuaz, atseguiña eguiten da ta an guchi egotera oitua d- n jotcen du. Zure ieran an go-

gotic egoten bacera, guero adisquide maitetzat, ta pozgarri anditzat servituco dizu.

Issillian, ta soseguan aprovechatcen du anima devotac, ta icasten ditu Escritura Sagraduco gauza ezcutuac. An topatcen ditu negarrezco ibayac arrats guztiyetan garbitceco, eta cembat eta gueyago munduco bullatic apartatcen dan, ambat eta gueyago bere Creadorearequin, adisquide especialarequin bezala tratatcen du. Mundu onetaco ezagun, ta adisquideetatic apartatcen danari bada Jaungoicoa bere Ainguëru Santuaquin alderatuco zayo. Obe da, ezcutuan dagoela bere animari contu eguitia, bere animaz casoric eguiten ez duela, milagroac eguitia baño. Alabatceco gauza da personà Erligiosoarentzat, guchitan campora irtetia, icu-

siya izatetic igues eguitia, ta beràc besteric icusi nai ez izatia. ¿Certaco icusi nai dezu, izatia libre etzaitzuna? Igarotcen da mundua, ta aren gusto guztiyac. Mundu onetaco gustoac, dembora divertitcen igarotcera, tiratcen gaituzte, baña ayec acabatcian, ¿cer beste gauzaric ateratcen dezu, ezbada concienciaco astuntasuna, ta biotceco distracioa, edo Ceruco gaucetaraco oztasuna? Irtete alegreac biurtce tristea ecartcen du ascotan, ta gaba beranduraño diversioan igarotciac, goiz tristea. Onela munduco gustoac atseguiñ sartcen dira, baña azquenian ozca eguiten dute, baita ere ill. ¿Cer emen icusten ez dezunic, bestetan icusi dezaquezu? Ona non dituzun Ceruac, ta lurrac, suba, ta beste elemento, edo lenasteac, bada beste gauza guztiyac oriye-

tatic eguiñac dira. ¿Cer icusi dezaquezu bestetan mundu onetan luzaro iraun dezaquenic? Pensatcen dezu venturaz aseco cerala, zure deseoa cumplitu ezquero, baña alferric necatuco cera. Munduan diran gauza guztiyac icusico bacenituque ere ¿cer izango litzaque ori, icuste alfer bat baicic? Alchatcitzu zure beguiyac Jaungoicoagana Cerura, ta erregutuzazu zure pecatu, ta faltacgatic. Utcitzatzu alferricaco gauzac oriyetan empleatcen diranentzat, ta emplea zaitez zu Jaungoicoac aguindu dizquitzunetan. Ichi zaitez zure bacarrean, ta deizayozu zugana zure Jesus maiteari. Zaude zure erretiroan, cergatic ez dezu bestetan or arimbat paque topatuco. Irten izan ez baciñan, ta munduco gauzatatic ecer entzun izan ez bacenuen, paque onean

obeto iraungo cenuen. Novedadeac, edo berriyac aditcia, gustatcen bazaitzu, soseguaren falta duda gabe sentituco dezu.

## 21 CAPITULOA.

*Biotceco damuaren gañean.*

Ceruco videan cerbait aurreratu nai baldin badezu iraunzazu Jaungoicoaren bildurrian, ta etzaitecela libreeguiya izan, ezbada sugetatcitzu zure sentiduac, ta ez diozazula alegriya zoroari zure buruban lecuric eman. Saya zaitez pecatuen damuan empleatcera, ta topatuco dezu devocioa. Jaungoicoaren bildurraren faltac galdu izan oi dituen on asco, eracartcen diozca pecatuen damuac animari. Arritcecoa da, nola persouà, bere destierroa, ta anima galtceco aimbeste ocasio icusten dituen mun-

du onetan, alegratu ditequíen. Gure ajola gabetasuna, ta gure falten descuidoa dala motivo ez ditugu sentitcen gure animaren penac, ezbada arrazoyarequin negar eguin bear guenuquien ascotan, zoroac bezala parra eguiten degu. Ez dago eguiyazco libertaderic, ta alegriya onic, ezbada Jaungoicoaren bildurrian conciencia onarequin. Zori onecoa distracio guztiyac beregandic quendu ditzaquena, ta pecatuen damu santura bildu ditequena. Zori onecoa bere conciencia ciquindu, edo carga dezáquien guztiya beregandic quentcen duena. Peleazazu animo andiyarequin, oitura oiturarequin quentcen da. Icasten baldin badezu zuc persònai utcitcen, bèrac ere utcico dizute zure obra onac eguiten. Etzaitecela besteren obretan empleatu, ta etzai-

tecela ere zarragoen eguitecoetan sartu. Beguira zayozu lembici zure burubari, ta consejazazu zure huruba, zuc amatcen dituzun guztiyac baño gueyago.

Ez baldin badezu personetan laguntzaric, etzaitecela orregatic penatu, ezbada bacarrir pena eman bear dizu pensatciac, etcerala Jaungoicoaren servitzari, ta Erligioso devotoari izatia tocatcen zayon bezalacoa. Gauza provechugarriyagoa, ta seguruagoa da ascotan, personàc mundu onetan consuelo asco ez izatia; ta batez ere munduco gaucetatic datocènac. Baña jaungoicozco consueloric ez izatia, edo guchitan sentitcia, gueroc guerala motivo guertatcen da, cergatic biotceco damua billatcen ez degu, ta munduco consueloac ez ditugu guztiro utcitcen. Ezagutuzazu, ez dezula mereci Jaun-

goicoaren consueloric, ezbada asco neque, ta pena. Persona bere pecatuaz bear bezala damutua dagoenian, ecin sufritu du mundua; ta pena ematen diote ango gauza guztiyac. Beti topatcen du penatceco, ta negar eguiteco arimbat motivo persona onàc: naiz pensa dezala bere personan, naiz progimoan, badaqui ezdala munduan penaric gabe iñor vici; ta cembat eta gogoticago bere buruba consideratcen duen, ambat eta damu gueyago artcen du. Pena justu, ta animaco damuaren motivoac gure pecatuac, ta vicioac dira, ceñatan añ bilduac gaude, ce guchitan Ceruco gauzac contemplatu, edo arguiro consideratu ditugu. Luzaroco vicitzaren gañean baño, zure eriotzaren gañean gueyago pensatuco bacenuque, ez dago dudaric, gogoticago emenda-

tuco ciñaquela. Pensatuco bacenituque ere biotcetic infernuco, edo purgatorioco penac, uste det, nequea, ta pena gustora sufrituço cenituquela, ta dan gauzaric gogorrena ere ecertan iruquico etcenuque. Baña cergatic ez diran gauz abec biotcera igarotcen, ta gauza biguñac amatcen ditugun; orregatic otzac, ta chit naguiyac gueldítcen guera. Espirituaren faltatic dator ascotan añi erraz gorputz miserablea quejatcia. Escazayozu bada humildadearequin Jaungoicoari pecatuen damua, ta esayozu Profeta Santuarequin batean *Manten nazazu Jauna; negarrezco oguiz, ta eman zazquidatzu eraritzat, negarrac neurriyan.*

## 22 CAPITULOA.

### *Gure miseriaren gañean.*

Eroceñ lecutara biur zaitecela,

ta egon zaitecela eroceñ lecutan, miserablea cera beti, Jaungoicoagana biurtcen ez bacera. ¿Cergatic penatcen cera nai dezun, edo deseatcen dezun bezala gauzaren bat guertatcen etzaitzulaco? ¿Nor da deseatcen duen bezala gauza guztiyac dituena? Ez ni, ez zu, ta ez mundu onetan vici dan iñor ere. Ez da munduan iñor neque, edo penaren bat gabe, naiz Erreguea, ta naiz Aita Santua izan dedilla. ¿Ceñ da ondoena dagoena? Duda gabe Jaungoicoagatic cerbait padecitu aldezaquena. Virtute guchico ascoc esaten dute: ¡O ceñ ondo vici dan onelaco! ¡Ceñ aberatsa dan, ceñ andiya, ceñ poderosoa, ta empleo andicoa! Baña beguira zayezu Ceruco ondasunai, ta icusico dezu, mundu onetaco guztiyac ecer ez dirala, batere seguridade gabecoac dirala, persona

gueyago necatcen dutela, ta ez dirala iñoiz cuidado andi, ta bildur gabe gozatcen. Ez da personaren zori ona, gauza asco izatia, ezbadà precisoa duena asco du.

Gauza miserablia da dudà gabe, munduan vici bearra. Cembat eta espiritualagoa dan personà, ambat eta penagarriyagoa eguiten zayó mundu onetan vici bearra, cergatican ambat eta obeto entendiłcen, ta claruago ezagutcen ditu guizonaren miseriyac. Bada, jan bearra, eran bearra, esna egon, ta ló erc eguin bearra, descansatu, ta bearra eguiñ bearra, ta gure izatiaren beste necesidadien sujeta egon bearra, eguiyaz da miseriya andiya personà devotoarentzat, pecatu guztiyetatic libre egotia deseo duenarentzat. Chit asco penatcen da personà devotoa mundu onetan gorputceco premiyaquin, obregatic

Profeta Santuac devocioarequin erregutcen du, orietatic libre gueldittceco deseoz: *Libra nazazu, Jauna, nere necesidadeetatic.* Baña ¡ay beren miseriya ezagutcen ez dutenaz! Ta oraindic gueyago; ¡ay miseriya au, ta munduco vicitza amatcen dutenaz! Aimbesterañoc bada amatcen dute vicitza au asco (bear dutena bearrian, edo esquean doy doya sortu albadezateque ere) ce emen beti vici albalitezque, Ceruaz casoric eguingo ez luteque. O juicioric, ta leyaltasunic ez duen biotcecoac, lurreco gaucetan aiñ sartuac daudenac, ce etzaye lurreco gustoric besteric gustatcen; baña errucarriyac, gogotic sentituco dute azquenean, ceñ gauza despreciagarri, ta erer eza zan amatcen zutena. Baña Santuac, ta Jesusen adisquide devotoac etzuten casoric

eguiñ sentiduen gustoco gauzaz, ta mundu onetan estimatcen ciranaz, ezbada ayen esperanza, ta atencio guztiya Ceruco gaucetan izaten zan. Ayen deseoac, beti iraungo duten, Ceruco gaucetara chussentcen ciran, mundu onetaco gaucen amorioac berètara arrastatu ezcitzan.

Ez dezazula, christau maitea; Ceruco' videàn aurreratceco esperanza galdu, badà oraindic demborac, ta orduac laguntcen dizu. ¿Cergatic zure asmoa gueroco utci nai dezu? Jaiqui zaitez, tá bereala asi zaitez, ta ezazu: Orain da eguiteco dembora egoquiya. Gaizqui zaudenian, ta penatua, orduan merecitceco dembora da. Descantsura etorri baño lenago, nequeetatic igaro bear dezu. Ez baldiñ badiozu zure burubari indar eguiten, ez dezu vicioa ventzutuco.

Gorputz miserable onequin gauden bitartian, pecatu gabe eciñ izango guera, ezta ere naigabe; ta penaric gabe. Gustatuco litzaiguque, neque guztiyetatic libre egotia, baña cergatic pecatua motivo inocencia galdu guenuen, galdu guenuen ere eguiyazco zori ona. Orregatic preciso da, guc paciencia izatia, ta Jaungoicoaren misericordian esperatcia, oraingo gaiztoqueriya igaro artian, ta mundu onetatic irten artian. ¡O ceñ andiya dan gure argaltasuna, bada beti gaitcera macurtua dago. Gaur confesatcen dituzu zure pecatuac, ta bigar bèrac atcera eguiten dituzu. Instante onetan propontcen dezu, gauzá gaiztoa ez eguitia, ta ordu bete igaro orduco, propositorìc eguin izan ez bacenuque bezala, eguiten dezu gauza gaiztoa. Arrazoyarequin bada hu-

milla gaitezque, ta utci dezaquegu betico, gure burubagatic gauza andiren bat pensatcia, añ argalac, ta aldacorrac gueran ezquero. Laster galdu diteque cuidadoaren faltaz, neque andiyen ondoren, Jaungoicoaren graciyarequin doy doya alcantzatu zana. ¿Cer izango da gutzaz azquenian, aiñ goiz lasaitcen asitcen baguera? ¡Ay gure errucarriyac, descantsatcen asitcen baguera, paquea, ta seguridadea ya baldiñ balegoque bezala, santidade eguiazcoaren señaleric gugan icusten ez dalaric! Asco conveni litzaque, gu berriz novicio, edo principiante ònac bezala Ceruco videan bestegandic eracutsiyac izatia, onela badere izango otė litzaquièn esperanzaren bat, gu emendatceco, ta Ceruco videan gueyago aurreratceco.

## 23 CAPITULOA.

### *Eriotzaren consideracioaren gañean.*

Iracurri zazu maiz.

Chit laster ilco cera, ta beragatic saya zaitez oraindaño baño obea izatera; Gaur vici da personà, ta bigar ez da mundu onetan agueri: ta beguiyetatic joan ezquero, laster gogotic ere joaten da. ¡O guizonaren biotzaren ichutasun, ta gogortasuna! Mundu onetaco gaucetan bacarric bere cuidadoa ipintcen du, bestecoaz cuidado gueyago izan bearrian. Gaur, edo bereala il bear duen personà bat bezala izan bear cenuque zure eguiteco; ta pensamentu guztiyetan. Conciencia ona baldin bacenu-

que, etcenioque eriotzari bildurric izango, obeto izango litzaque pecatuetatic apartatcia, eriotzatic igues egitia baño. Ez baldiñ bazaude gaur illtceco prest ¿nola bigar egongo cera? Bigarco eguna ez jaquiña da ¿ta nondic daquizu izango dezun? ¿Cer valio du luzaro vicitciac, añ guchi emendatcen gueralaric? ¡Ay! luzaro vicitciac ez du beti emendatcen, ezbada ascotan culpa gueitcen du. Ojala egun batian badere mundu onetan ondo vicitu izan baguiña. Ascoc urteac contatcen dituzte, convertitu cirala, baña ascotán emiendaren, frutu chiquiya icusten da ayetan. Iltcia bildurtcecoa baldiñ bada, peligrosoagoa izango da venturaz luzaro vicitcia. Zori onecoa bere eriotzaco ordua beti beguiyen aurrian dauqana, ta iltceco egunero prestatcen dana. Icusi

baldin badezu norbait iltcen, pensazazu, vide artatic bertatic igaro bear dezula zuc ere. Goician pensazazu, etcerala arratsera allegatuco, ta arratsean ez diozazula zure burubari urrengo goiza prometitu. Beti prestatua egon zaitez bada, ta alaco moduan vici zaitez, ce eciñ eriotzac prestatu gabea topazaitzacala. Asco supitoan, edo bat batian, ta uste gabe iltcen dira, cergatic uste ez dan orduan Jauna etortcen da, personari juiciora deitcera, Jesusec esan zuen bezala.

Azqueneco ordu ura datorrenian, ascoz beste modutara asico cera zure vicitza pasatu guztiyagatic pensatcen, ta pena andiya izango dezu, aiñ juicio guchicoa; ta naguiya Jaungoicoaren servicioan izan ciñalaco. ¡O ceñ zori onecoa dan, baita ere prudentia, bere buruba eriotzaco orduan to-

patcia nai luquien bezalacoa, orañ izateco, aleguiña eguiten duena! Cergatic ondo iltceco confianza andiya ematen du munduaren desprecio cabalac, virtutietan aurreratceco deseo andiyac, vicitza santuaren amorioac, penitenciaco nequeac, obediencian puntuala izatiac, bere buruba ucatceac, ta Jesusen amorèz eroceñ neque, edo eramanquizun paciencian eramatiac. Osasuna dezun demboran on asco eguin dezaquezu, baña ez daquit nic, cer eguin alcodezun; eri zaudenian. Eritasuna motivo guchi eguiten dira obeagoac, ta emendatcen dira; ta vorondatezco viageetan dabiltazanac ere, edo ibilli nayac guchi santificatcen dira. Ez dezazula zure adisquide, ta aidietan confiatu, ta ez dezazula gueroco utci, zure animaren onian empleatcia, cergatic uste dezun

baño lenago aztuco dira persònac zutzaz. Obe da oraiñ alde aurretic demboraz prestatcia, ta zure aurretic obra onac bialtcia, bestien laguntzan esperatu baño. Ez baldin badezu oraiñ cedorrec zure burubagatic cuidadoric ¿ceñec guero zutzaz izango du? Orain da dembora guztiz estimagarriya, orain dira salvacioco egunac, orain errecibitcia mereci duen dembora; baña ¡ay pena! ez dezu obeto empleatcen betico zori ona mereci dezaquezun dembora au. Etorrico da dembora, egun bat, edo ordu bat, emendatceco deseatuco dezuna, ta ez daquit irichico dezun.

Ea, Cristau maitea, beguirazazu arren, ceñ peligro anditic, ta bildurretic libra zaiztequien, orain beti Jaungoicoaren bildurrecoa, ta eriotzaz aztutcen etce-

rana ; izaten bacera. Vici zaitez orain, eriotza datorrenian, bildur baño, poz gueyago eman dizaquezun moduan. Içasizazu orain mundurako iltcen, orduan Jesu Cristorentzat vicitcen asitceco. Içasizazu orain, munduco gauza guztiyac despreciatcen, orduan libertade guztiyarequin Jesu Cristogana joan zaitecen. Castigazazu orain zure gorputza penitenciarequin, orduan confianza segurua izan dezazun. ¡Ah choroà! ¿cergatic luzaro vici uste dezu, egun bat seguru izan ezta? ¡O cembat engañatu izan diran, ta uste eztzutenian iltciran! ¿Cembat bider entzun dezu, bata ezpatarequin iltzutela, bestea itozala, besteac goitic erorita, lepoa autsi zuela, bestea, jaten arizala, ill otcic gueldituzala, bestea, jocoan arizala; bestea subarequin, bestea burniz-

co armaren batequin, bestea peste, edo izurriyarequin, bestea lapurreriyan cebillela; ta onela guztiyen azquena eriotza da, ta personen vicitza itzala bezala, bat batian igarotcen da. ¿Nor acordatuco da zutzaz ill ezquero? ¿Ta norc erreguтuco du? Eguizu, eguizu oraiñ, Christau maitia, aldezun guztiya, cergatic ez daquizu noiz ilco ceran, ta ez daquizu ere, ill ezquero, cer izango dezun. Dembora dezun bitartian, bilducitzu zuretzat acabatuco ez diran Ceruco ondasunac. Ez dezazula zure animaren ona ezbada beste gauzaric pensatu, bacarric Jaungoicoaren servicioco gauzaz cuidadoa izanzazu. Eguin citzu oraiñ adisquide, Santuac honratuaz, ta ayen obrac jarraituaz, mundu onetatic irteten ceranian, berac errecibi zaitzaten Ceruco glorian. Vici zaitez mundu

onetan erbestecoa, ta campotarra baldiñ baciñaque bezala, munduco cer eguiñic zuri tocatuco ez baldin balitzaitzuque bezala. Biotza libre, ta Jaungoicoagana gorona jasoa guardazazu, cergatic ez dezu mundu onetan betico zure erriya. Chussen citzu egunero Cerura oracio, ta negarrac, mereci dezan zure animac, mundu onetatic irteten danian, Jaungoicoagana ondo allegatcia. Amen.

## 24 CAPITULOA.

### *Jaungoicoaren juicioaren, ta pecatarien penen gañean.*

Beguira zayozu gauza guztiyetan azquenari, ta nola egongo ceran guztiya daquien, ta ecer ezcutatcen etzayon juez estuaren aurrean ceña ez da erregaloa-

Iracurri zazu maiz.

quin ere biguntcen, escusaric ere ez du artcen, ezbada justu dana juzgatuco du. ¡O pecatari guztiz errucarri, ta censu gabea! ¿Cer erantzungo diozu zure pecatu guztiyac daquizquien Jaungoicoari, aserre dagoen guizon baten arpeguiyac ere ascotan bildurtcen bazaitu? ¿Cergatic etcera ondo prestatcen juicioco eguneraco, iñor bestec escusatuco, edo defendituco ez duen; ezbada bere burubarequin cer eguiñ izango duen dembora artaraco? Oraiñ zure nequea provechugarriya da, ta zure negarrac, ta pecatuen damua ere entzungo du Jaungoicoac, ta valìoco dizu pecatuacgatic satisfacioa emateco, ta purgatorioco penatatic libratceco. Purgatorio andi, ta provechugarriya du personà sufrituac, iñorgandic ofenditua danian, berari eguin dion gaizquiyaz baño, aren

pecatuaz pena gueyago artcen duenac; bere etsayacgatic gustora oracioa eguin, ta biotcetic barcatcen dienac, besteai barcàcioa escatcia luzatcen ez duenac, aserratu baño, erruquitu errazago eguiten danac, bere burubari contra maiz eguiten dionac, ta araguiya espirituari sujetatceco aleguiña eguiten duenac. Obe da, orain pecatuacgatic satisfacioa ematia, ta vicioac ebaquitcia, gueroco utci baño. Engañatcen degu duda gabe gueren buruba gorputzari diogun arrazoi gabeco amorioa dala motivo. ¿Cer castigatuco du betico sub arc, ezbada zure pecatuac? Cembat gueyago orain zure burubari barcatcen diozun, ta sentiduen gustoac cumplitcen dituzun, ambat eta gogoticago guero pagatuco dezu, ta infernuan errea izateco, gai gueyago gordetcen dezu,

Cer gaucetan pecatu eguin zuen personàc, artan gueyago penatua izango da. An naguiyac susco aculluaquin penatuac izango dira, eta gosetiac, edo golosoac gose, ta egarriyarequin, ta ez alere chiquiyarequin : lujuriosoac pique iraquiñarequin, ta usai gaiztoco azufrearequin, eta invidiosoac miñaren poderioz, chacur amurratuac bezala zanga, edo carrassiya eguingo dute. Ez da bere pena particular, edo beresiya gabeco vicioric izango. An soberboac ecin gueyagoraño lotsaz beteac izango dira, eta guticiosoac premiya guztiz erruquigarriyaz aseac izango dira. An ordu bacar bat ere penagarriyagoa izango da, emen eun urte penitenciaric dan gogorrenian baño. Ez dago batere descantsuric, batere consueloric condenatuentzat, baña emen noician

beñ descantsatcen da trabajuetatic, ta adisquideaquin ere consolatcen da. Vici zaitez orain contuz, ta pecatuen damuarequin, juicioco egunian cuidado gabe zori onecoaquin egon zaitecen, bada orduan chit sendo egongo dira justuac berac penatu, ta perseguitu cituztenen contra. Orduan iñor juzgatceco egongo da, orain besteac aren contra eguiten dituzten juzgo gaiztoac pacienciarequin eramaten dituena. Orduan confianza andiya izango du pobreàc, ta humillàc, ta bildurrez beteric egongo da sob[illegible]boa. Orduan ezagutuco da, jaquintsoa izanzala, bere vicitzan Cristoren amorèz tontoa, ta despreciatua izaten icasi zuena. Orduan lagunduco dute an, emen paciencian eraman ciran neque guztiyac, ta pecataria mututuric egongo da. Orduan alegratuco dira

devotoac, ta penatuco dira Jaungoicoa servitceco cuidadoric ez dutenac. Orduan gueyago gozatuco da penitenciarequin penatutaco gorputza, bèti gustoetan vicitu zana baño. Orduan eder emango du jantci pobreac, ta itzusi, jantci aberatsac, edo ederrac. Orduan gueyago alabatuco da eche pobrechoa, palacio doratua baño. Orduan gueyago lagunduco du paciencia sendoàc, mundu guztico anditasunac baño. Orduan gueyago alabatuco da obediencia prontoa, munduco asco jaquin guciya baño. Orduan gueyago alegratuco du conciencia on, ta garbiyac, filosofia jaquitiac baño. Orduan gueyago valioco du ondasunen despreCioac, munduco tesoro guztiyac baño. Orduan gueyago gozatuco da oracio devotoagatic, jan delicaduagatic baño. Orduan gue-

yago consolatuco cera issillic, edo silencioan egoten ciñalaco, itzquetan egoten ciñalaco baño. Orduan gueyago valioco dute obra santuac, itz eder ascoc baño. Orduan gueyago gustatuco da vicitza estua, ta penitencia andiya eguiña, munduco gusto guztiyac baño.

Icasizazu orain guchiyan padecitcen, orduan pena andiyagoetatic libra zaitecen. Probazazu emen lembici, cer sufritu aldezaquezun guero. Orain aiñ guchi sufritu albadezaquezu ¿nola sufrituco dituzu betico tormentuac? Orain pena pisca batec aimbeste galtcen badizu paciencia ¿cer izango da infernuco subarrequin? Beguiratzazu; ecin eguiyaz bi consuelo izan ditzaquezula, au da, emen munduan gozatu, ta guero Jesu Cristorequin Ceruan erreinatu. Gaurco egunerano ere honretan, ta

gustoetan vicitu izan baldin baciñaque ere ¿cer valioco lizuque orrec guztiyac, instante onetan iltcia guertatuco balitzaitzuque? *Guztiya da vanidadea, Jaungoicoa amatcia, ta bera bacarric servitciaz campora.* Cergatic Jaungoicoa biotz guztitic amatcen duenac, ez eriotza, ez castigua, ez juicioa, ta ez infernua bildur du, cergatic, amorio perfectoac Jaungoicoagana culdado gabe allegatceco seguridadea ematen dio. Baña ez da arritcecoa, oraindic pecatuac gustatcen zayozcanac, eriotzari, ta juicioari bildur izatea. On da orregatic ere, ez baldin bazaitu amorioac pecatutic apartatcen, infernuco penen bildurrac badere atcera eraguitia. Baña Jaungoicoaren bildurraz aztutcen danac, ez du luzaro onean iraungo, ezbada deabruaren lazoetan laster erorico da.

## 25 CAPITULOA.

### *Gure emiendaren cuidado andiyaren gañean.*

Izan zaitez cuidado andicoa, ta diligentia Jaungoicoaren servicioan, ta pensazazu beti, certara etorri ciñan, ta certaraco utci cenuen mundua. ¿Venturaz etzan izan Jaungoicoarentzat vicitceco, ta persona espirituala eguiteco? Irazaqui zaitez virtutietan aurreratceco deseoan, cergatic zure nequearen sariya laster errecibituco dezu, ta ezda orduan zugan iñongo aldetic bildurric, ta penaric izango. Oraiñ guchi bat trabajatuco dezu, ta guero descantzu andiya, ta betico alegriya topatuco dezu. Zuc leyal, ta lasaitu gabe irauten badezu Jaungoicoaren servicioan, bera ere duda gabe leyala, ta aberatsa izango da, zuri paga-

tceco. Iruqui bear dezu esperanzá ona, Cerua gozatcera allegatuco cerala, baña ez dezu seguridaderic artu bear, Jaungoicoaren servicioan lasaitu ez dezazun. Persona bat salvatuco, edo condenatuco ote zan pensatcen, penaturic cebillen demboran, egun batean auspez etcin zan bere penarequin oracioan aldare baten oñetan, ta esaten zuela bere artian: ¡Ay baldiñ banequi, oraindic iraungo derala Jaungoicoaren servicioan! Entzun zuen bereala bere barrenian Jaungoicoaren itza, esaten ciona: *Ori baldin bacenequi ¿cer eguin naico cenugue? Eguizu orain orduan eguin naico cenuquena, ta seguru egongo cera.* Au entzunic, bereala consolaturic, ta bere biotzan indarturic, entregatu zan Jaungoicoaren vorondatera, ta bere cuidado penagarriya utci zuen; ta

etzuen andic aurrera curiosidadearequin jaquin nai izandu, cer guero guertatuco ote citzayon, ezbada gueyago sayatu zan, Jaungoicoaren gustoco gauza cer zan, artan empleatceco, ezagutcera: *Esperazazu Jaungoicoagan, ta obra onac eguin citzu*, dio Profeta Santuac, vici zaitez onela lurrean, ta aren ondasunaz mantendua izango cera.

Gauza bacar batec atceratcen ditu asco virtutietan aurreratcetic, ta gogotic emendatcetic, ta ezda besteric, ezbada nequearen bildurra, gauza gaitza, ta neque andiya irurjitcen zayelaco, orretan empleatcia. Baña beste guztiyac baño gueyago aurreratcen dute virtutietan, berentzac gogorrenac, ta contrarioenac diranac ventzutcera animo andiyarequin sayatcen diranac, cergatic, non gueyena

bere buruba venízutcen, ta mortificatcen duen persònac, an gueyena aprovechaſcen du, ta graciya gueyago merecitcen du. Baña ez dute guztiyac ventzutceco, ta mortificatceco animo berdiña: baña orregatic ere, bere aurreratcearen deseo andiya duena, indarsuagoa izango da aprovechatceco, pasio gaizto gueyago izanagatic, costumbre onetacoa baldin bada ere, virtutietarаco deseo añ andiya ez duena baño. Bi gauzac laguntcen dute asco emienda andiraco; au da, apartatcia gogotic gure griña gaiztoac eraman nai gaituzten gaucetatic, ta procuratcia gogotic faltaric andiyena eguiten digun gauza ona, edo virtutea. Procurazazu ere gueyena apartatcia beste persònetan gustatcen etzaizquitzun gaucetatic. Procurazazu ocasio guztiyetan zure animaco aurreratcea.

Egemplo onic icusten, edo entzuten badezu, irazaqui zaitez jarraitceco deseoan; baña gaiztoric icusten badezu, contu, ez ura bera eguiñ, ta noizbait eguin badezu, lembaitlen emendatcia procurazazu. Zuc besteai beguiratcen diezun bezala, zuri ere besteac beguiratcen dizute. ¡O cer gauza atseguiña dan bere compañian vici diran persona devotoac, costumbre onetacoac, ta beren obligacioac ondo cumplitcen dituztenac icustia! ¡Baña ceñ gauza triste ta penagarriya dan, bear ez dan bezala viei diranac, ta beren obligacioac cumplitcen ez dituztenac icustea! ¡Ceñ caltetsoa dan bere estaduco obligacioac cumplitceco cuidadda utcitcia, ta aguindu etzayozcan gaucetara aficionatcia!

Acorda zaitez artu cenuen propositoaz, ta ipiñizazu beguien aur-

tian Jesus crucificatua. Ondo lotsa zaitezque Jesusen vicitza icusirie, cergatic añ guchi sayatu cera oraiñdaño beraren antcecoa eguitera, Jaungoicoaren videan luzaro vicitu izan bacera erc. Jesusen vicitza guztiz santua, ta beraren pasioa cuidado, ta devocio andiarequin consideratçen empleatcen dan personàc, animaraco bear dituen, ta conveni zayozcan gauza guztiyac ugari an topatuco ditu, ta ez du Jesusez campora gauza obeagoren billa ibilli bearric ¡ Ay, baldin Jesus crucificatua gure biotcera etorrico balitz, ceñ laster, ta ceñ jaquintsuac izango guiñaquien! Jaungoicoaren servicioan sutua dagoen Erligiosoac, aguintcen zayon guztiya ondo eramaten du. Baña Jaungoicoaren servicioan epela dagoenac, nequea nequearen gañ du, ta alde guztiyetatic an-

siya, edo pena, cergatic animaço consueloa falta zayo, ta campocoa billatcia eragozten zayo. Bere erreglas cuidadoric ez duen Erligiosoac calte andiya dauca bere animan. Lasayago vicitcia procuratcen duenac, ez du soseguric izango bere barrenen; cergatic ezbada gauz onec, besteac pena emango dio. Ecarriztatzu gogora asco Erligioso ondo estu Religioetan viçi diranac; guchitan irteten dira campora, guchi tratatcen dute munduarequin, chit pobre jaten dute, jantciya ere janaren antcecoa dute, bear asco eguiten dute, guchi its eguiten dute, luzaro lotara gabe egoten dira, goiz jaiquitcen dira, oracio asco eguiten dute, maiz iracurtcen dute, ta beren erregla cuidado andiyarequin cumplitcen dute. Beguira zayezu Cartujuai, Bernardoai, ta beste asco

Religioco Erligioso, ta Monjaz, nola arratsero Jaungoicoa alabatcera jaiquitcen diran; ta orregatic, gauza itzusiya izango litzaque, obra aiñ santuan zu naguiya izatia, aimbeste Erligioso Jaungoicoa alabatcen empleatcen diranian.

¡Ay ez baldin baguenuque beste cer eguiñic; ezbada biotz guztitic Jaungoicoa alabatcen egotia! ¡Ay ez baldin bacenuque jateco, erateco, ta ló eguiteco premiyaric; ezbada beti egon albacintezque Jaungoicoa alabatcen, ta bacarric animaco gauzetan empleatua! Orduan ascoz zori obeagoçoa izango ciñaque, oraiñ baño, zure gorputzari croceñ premiyetan servitcen diozunian baño. Ojala premiya abec ez baldin baliraque, ezbada bacarric animaco jate espiritualac, ceñiac ¡ay! sobra guchitan probatcen ditugu. Allegatcen danian

personà, mundu onetaco gauretan, ta criaturetan consueloric ez nai izatera, orduan lembici Jaungoicoa berari ondo sentitcen asitcen zayo, orduan ere egongo da ondo contentu guertatcen zayozcan gauza guztiyetzaz. Orduan ez ascogatic alegratuco da, ta ez guchigatic penatuco da, ezbada jartcen da guztiro, ta confianzarequin beretzat gauza guztiyetan guztiya dan Jaungoicoaren escubetan, ceñari etzayo ecer iltcen, ez bada guztiyac vici zaizca, ta bere vorondatera bereala servitcen diote. Acorda zaitez beti azquenaz; ta dembora galdua ez dala biurtcen. Cuidado, ta diligencia andi gabe ez dezu iñoiz virtuteric alcantzatuco. Asitcen bacera oztutcen, asico cera animaco penac sentitcen, bassa irauten badezu, Jaungoicoaren servicioan gogotic empleatcen, paque

andiya topatuco dezu, ta neque guchiyago sentituco dezu Jaungoicoaren graciya, ta virtutiaren amorioagatic. Jaungoicoaren servicioan irazaquiya, ta diligentia dan personà, guztira dago prest. Neque andiyagoa da vicioai, ta griña gaiztoai contra eguitia; gorputz lanetan aritcia baño. Falta chiquiyetatic apartatçen ez dana, piscaca, piscaca andiyetan erorico da. Arratsean beti alegratuco cera, eguna ondo empleatcen badezu. Contu eguiyozu zure burubari, muguizazu zure buruba Jaungoicoa servitçera, consejatzazu zure buruba. Bestietzaz nai duena izan dedilla, ez dezazula ziuc zure burubaren cuidadoa utci. Zure burubari indar eraguiten diozun arimbat aprovechatuco cera. Amen.

✝
VICI BEDI JESUS.

# JESUSEN IMITACIOCO BIGARREN LIBRUBA,

Ceñian ematen dira personà bere barrenera muguitceco consejuac.

## 1 CAPITULOA.

*Barrengo, edo animaco conversacioaren gañean.*

*Zuen barrenian dago Jaungoicoaren erreinoa*, dio Jaunac. Jaungoicoagana biotz guztitic biur zaitez, ta utcizazu mundu miserable au, ta zure animac descantsua izango du. Icasizazu campoco, edo animacoac ez diran gauzac des-

preciatcen, ta zure animaren cuidadoan emplea zaitez, ta icusico dezu, Jaungoicoaren erreinoa zugana etortcen. Cergatic Jaungoicoaren erreinoa paque, ta poza Espiritu Santuagan da., ceña etzaye Jaungoicoaren bildur gabecoai ematen. Etorrico da zugana Jesus, ta emango dizu animaco consueloa, prestatcen badiozu zure barrenian berari dagoquion lecua. Aren gloriya, ta edertasun guztiya barrerontz da, ta an egotia gustatcen zayo. Maiz visitatcen du bere animarequin ocupatcen dan personà, conversacio atsguiña, consuelo gusto andicoa, paque asco, ta adisquidetasun guztiz andiya onelaco personarequin izaten du. Ea, anima leyala, prestazayozu Esposo oni zure biotza, zugana etorri, ta zurequin vici dedin, dio bada berac; *Amatcen baldin banau ni*

*norbaitec, nere itza guardatuco du, etorrico guera argana, ta berarequin gueldituco guera.* Emayozu bada lecu Cristori, ta beste guztiyai atea ichizayezu. Jesus maitea zurequin izan ezquero, aberatsa cera, ta beardezun guztiya badezu. Beràc izango du zuc bear dituzun gaucen cuidadoa, ta ala, ez dezu munduco personetan cer esperatu bearric izango. Munduco persònac laster aldatcen dira, ta faltatcen dute, baña Jesusec beti irauten du, ta bera amatcen duenarequin beti firme egoten da. Ez da confianza andiric izan bear persona argal; ta illcorrian, lagundezaquena; ta adisquidea izanagatic; ezda ere pena asco artu bear, noiz bait orrelacoac guri contra eguiñagatic. Gaur zure adisquide diranac, bigar zure etsai izan ditzaquezu, ta gaur etsai dituzunac, bigar a-

disquide, aicia bezala aldatcen dira ascotan. Ipiñi zazu zure confianza guztiya Jaungoicoagan, ta izan dedilla bera zure bildurra, ta amorioa.

Ez dezu emen beti vicitcecò erriric, ta eroceñ lecutara joan zaitecela, ta vici zaitecela, beti campotarra, ta erbestecoa cera; ez dezu ere iñoiz descantsuric izango, ez baldin bacerai Jesusequin biotz guztitic bat eguiten. ¿Cer beguiratcen dezu mundu onetan, ez baldin bada au zure descantsu lecuba? Geruan izan bear du zure vicitzac, ta ala, pasaizoz bezala munduco gauza guztiyac beguiratu bear dituzu; guztiyac igarotcen dira, ta zu ayequin batian. Ez dezazula arren zure biotza munduco gaucetara arrimatu, ayengandic preso artua izan etzaitecen, ta galdu etzaitecen. Zure

pensamentua beti Jaungoicoagana izan bedi, ta zure oracioa beti Jesus maiteagana chussen zazu. Gauza andiyetan consideratcen ez baldin badaquizu, descantsazazu Jesusen pasioan, ta aren llaga santuac consideratcen gustora egon zaitez; cergatic ayetan devocioarequin beguiyac ipitcen badituzu, zure nequeetan indar andiya sentituco dezu, ta personen desprecioaz caso guchi eguingo dezu, ta zure contraco murmuracioac erraz eramango dituzu. Jesus ere munduan despreciatua izan zan, ta necesidade guztiz andico demboran bere ezagun, ta aideacgandic desprecioen artian bacarric utciya. Jesusec padecitu, ta despreciatua izatia nai izan zuen, ¿ta zu atrebitcen cera iñorgatic quejatcera? Jesusec izan cituen etsayac, ta beragatic gaizqui esaleac,

ta zuc guztiac adisquideac, ta onguilleac izan nai dituzu? ¿Nola paciencIaren coroa logratuco dezu, cer sufrituric guertatcen ez bazaitzu? Zure contraco gauzaric padecitu nai ezbadezu ¿nola Jesusen adisquidea izango cera? Sufrizazu Jesusequin, ta Jesusgatic, berarequin erreinatu nai badezu. Sartu izan baciñan noizbait bear arimbat Jesusen barrenen, ta aren amorio anditic piscabat probatu izan bacenu, orduan zure convenienciagatic, edo orren contrarioagatic etcenuen batere casoric eguingo; ezbada eguiten zaizquitzun desprecioacgatic alegratu eguingo ciñan, cergatic Jesusen amorioac personà bere buruba despreciatcera muguitcen du.

Jesusen, ta eguiyaren amantia, ta eguiyaz espirituala dana, ta bear ez diran aficioetatic libre dagoena,

erraz biurtu diteque Jaungoicoan consideratcera, igo diteque espirituan bere gañ, ta egon diteque consuelo andiyan, Ceruco gaucen consideracioan gozatcen. Gàuzac, bèrac diran bezala, (ez esaten, edo estimatcen diran bezala) ezagutcen, ta estimatcen dituena, eguiyaz jaquintsoa da, guizonengandic baño Jaungoicoagandic gueyago eracutsiya. Bere bareneronz ibiltcen, ta munduco gauzac guchi estimatcen daqueinac, ez du lecu, ta dembora beguira egon bearric, obra santuetan empleatceco. Laster bildutcen da personà espirituala bere barrenera, cergatic ezda iñoiz guztiro campora zabaltcen. Ez dio eragozten gorputz lanac, edo precisoco eguitecoac ezbada gauzac nola datocen, ala acomodatcen da. Animan ondo prestatua dagoenac, ez du casoric

eguiten persona gaiztoen eguiteco gaiztoaz. Campoco gauzac cembat amatcen dituen personàc, aimbeste eragozten, ta distraitcen da. Bear bezalacoa baldin baciñaque, ta griña gaiztoetatic ondo garbitua baldin baceundeque, zure onean, ta provechuan gauza guztiyac biurtuco litzaitcitzuque. Cergatic etzauden zure burubarentzat bear bezala illa, ta munduco gaucetatic apartatua, orregatic asco gauzac naigabea ematen dizu, ta animaco paquea galtcen dezu. Ezda personaren biotza aimbeste enredatcen, ta ciquintcen duen gauzaric, nola criaturen amorio ciquiñac. Ezbaldin badezu campoco aldetic consolatu nai, orduan egongo cera Ceruco gauzac arguiro consideratceco moduan, ta barrendic maiz consolatuco cera.

## 2 CAPITULOA.

### *Humil sufritcearen gañean.*

Ez dezazula casoric eguin zure alde, edo zure contra nor dan, ezbada procurazazu bacarric, eguiten dituzun gauza guztiyetan Jaungoicoa zurequin izatia. Conciencia ona iruquizazu, ta Jaungoicoac ondo guardatuco zaitu. Jaungoicoac lagundu nai dionari, iñoren ere gaiztotasunac calteric ecin eguin diozaque. Baldin badaquizu zuc issillic egoten, ta sufritcen; etzaitzu Jaungoicoaren laguntza faltaco. Beràc daqui zu libratceco dembora, ta modua, ta orregatic utci bear cera beraren borondatera. Jaungoicoaren eguitecoa da laguntcia, ta lotsa guztitic libratcia. Chit asco valio du ascotan, humildade gueyago guardatceco, besteac gure faltac jaquitia, ta ar-

peguira emàtia. Bere faltacgatic humillatcen danian persònà, erraz bestiac gozatcen ditu, ta aserratcen zayozcanai erraz satisfacioa ematen die. Humillà Jaungoicoac defenditcen du, ta libratcen du, humillà amatcen du, ta consolatcen du, humillagana inclinatcen da, humillari ematen dio graciya andiya, ta padecitcen duen persecucioaren ondoren honra andiyan ipintcen du; humillari bere gauza issillac aditcera ematen diozca, ta beragana gozotoro convidatcen, ta ecartcen du. Humilla bere lotsa arturic, paque andiyan dago, cergatic Jaungoicoagan dago; ta ez munduagan. Ez dezazula pensatu virtutietan ecer aurreratuco dezula; ez baldin badezu zure burua beste guztiyac baño guchiyagotzat ezagutcen.

## 8 CAPITULOA.

### *Persona on, ta paquetsuaren gañian.*

Conserva zaitez lembici cerori paquean, ta guero bestiac paquetuco dituzu. Gueyago aprovechatcen du personà paquetsuac, asco jaquiñac baño. Pasioac artua dagoen personàc, ona ere gaitcera biurtcen du, ta erraz gaitza sinisten du. Personà on paquetsuac onerà guztiya biurtcen du. Ondo paquean dagoenac, iñorgatic ezdu sospechatcen, baña contenturic, ta soseguric gabe dagoena, sospecha ascorequin penatua izaten da; ez berà sosegatcen da, ta besteai sosegatcen utcitcen die: ascotan esaten du, esan bear ez luquena, ta eguitia conveniago litzayoquena, ascotan utcitcen du eguin gabe. Besteac eguin bear dutena erre-

paratcen du, ta beràc eguiñ bear duenaz casoric eguiten ezdu. Zure burubaz lembici cuidadoa izanzazu, ta orrela ondo contu eguin diozaquezu zure progimoari ere. Ondo daquizu zuc zure faltac escusatcen, ta edertcen, ta bestien escusac artu nai ez dituzu. Arrazoyago izango litzaque, zuc zure buruba acusatcia, ta zure progimoa escusatcia. Bestiac zuri sũfritcia nai baldin badezu, zuc ere bestiai sufrizayezu. Beguirazazu eguiyazco caridade, ta humildadetic ceñ urruti zauden, ceña duena, ezda bere buruagatic ezbada, bestegatic aserratcen. Ez da gauza andiya on, ta mantsoaquin tratatcia, cergatic au beréz guztiai gustatcen zayen gauza da, ta erocéñec du paquea bere gustoco personaquin, ta besteac baño gueyago amatcen ditu; baña gogor,

ta gaiztoaquin, edo Jaungoicoaren bildur gabecoaquin, ta gure contrarioaquin paquean vici al izatia, doai andiya guztiz alabatcecoa, ta biotz andico eguitecoa da. Badira beren burubac paquean conservatcen dituztenac, ta bestiaquin ere paquea dutenac; ta badira beren burubaquin paqueric ez dutenac, ta bestiai paquean utcitcen ez dietenac, necosoac dira onelacoac bestientzat, baña berentzat necosoagoac. Badira ere beren buruaquin paquean conservatcen diranac, ta bestiac ere paquetcia procuratcen dutenac. Mundu onetaco gure paque guztiyac humildadiarequin sufritcian izan bear du, ta ez, gure contraco gauzaric ez sentitcian. Sufritcen ondoena daquienac izango du paqueric andiyena. Onelacoa bere burubaren ventzutzallea da, munduaren jabea, Je-

susen adisquidea, ta Ceruco herederoa.

## 4 CAPITULOA.

### *Biotz garbiyaren, ta intencio onaren gañian.*

Bi egarequin jaiquitcen da personà lurreco gaucetatic; abec dira, intencio ona, ta biotz garbiya. Intencio onàc Jaungoicoari beguiratcen dio, biotz garbiyac, edo aficio garbiyac errecibitu, ta gustatu eguiten du. Etzaitu iñoiz obra onàc eragotcico, aficio gaizto guztitic biotza libre baldin badaucazu. Jaungoicoaren gustora, ta progimoaren provechua ezbada besteric billatcen badezu, barrengo libertadearen jabe izango etcera. Zure biotza bear bezalacoa baldin balitzaque, criatura guztiyac vicitzaren ispillua, ta doctrina santuco librua izango liraque zu-

retzat. Ezda criatura aiñ chiqui, ta despreciyagarriric, Jaungoicoaren ontasuna aditcera ematen ez duenic. Zu barrendic ona, ta garbiya baciñaque, orduan guztiya icusico, ta ondo ezagutuco cenuque. Biotz garbiya Cerua, ta infernua ezagutceraño igarotcen da. Bere barrenian bacoitza dan bezala, campotic ere gauzac juzgatcen ditu. Munduan consueloric baldin bada, biotz garbico personàc bacarric gozatcen du; ta baldin bada iñon pena, edo nai gaberic, au obeto ezagutcen du conciencia gaiztoac; au arc ondoena ezagutcen du. Surtan sartcen dan burniyari ordoya joan, ta guztiya su eguiñic gueldicen dan bezala, Jaungoicoagana guztiro biurtcen dan personà ere erazten da moduren batian bere gorputzaren izatetic, ta guizon berri bat egui-

ten da. Jaungoicoaren servicioan oztutcen persona asitcen danian, orduan neque chiquiyac ere bilhurtcen du, ta pocic artcen du animaz campoco gaucetatic consueloa. Baña asitcen danian perfeccioarequin bere buruba ventzutcen, ta gogotic Jaungoicoaren servicioan empleatcen, orduan gauza chiquiyac iruritcen zayozca, lenago andiyac iruritcen citzayozcanac.

## 5 CAPITULOA.

### *Bere buruaren consideracioaren gañian.*

Ecin gueren burubari gueyegui sinisdiozaquegu. Argui guchi da gugan, ta deguna ere laster galtcen degu gure zabarqueriya motivo. Ez degu ere erreparatcen ascotan, barrendic añ ichuac guerala, Ascotan gaizqui eguiten degu,

ta gaizquiyago escusatcen degu. Pasioz muguitcen guera ascotan, ta Jaungoicoaren, edo progimoaren amoréz muguitcen guerala, uste izaten degu. Gauza chiquiyac bestietan, erreprenditcen ditugú, ta gure andiyagoaz casorie eguiten ez degu. Laster asço sentitcen, ta ponderatcen degu bestiengandic, cer sufritcen degun, baña ez degu beguiratcen gugandic bestiac cembat sufritcen duten. Bacoitzac bereac ondo, ta bear bezala consideratuco balituque, ez luque bestegatic cer juzgatu asco topatuco. Personà espiritualac bere burubaren cuidádoa beste cuidado guztiyen aurretic paratcen du; ta bere burubari ondo beguiratcen diona, erraz bestien gañian issillic egoten da. Etcera iñioiz personà espirituala, ta devotoa izango, bestien gauzaz issillic egoten ez

bacera, ta zure burubari guztiyen aurretic beguiratcen ez badiozu. Zure burubari, ta Jaungoicoagan empleatcen bacera, guchi mugui-tuco zaitu campotic sentitcen de-zunac. ¿Non zaude zure burubarequin eztaudenian? Eta zure burubaz ez beste gauza guztiyac on-do beguiratu badituzu ere ¿ cer valiatu dizu? Paquea izan, ta Jaungoicoarequin bat eguin nai baldin badezu, preciso da, beste guztiyac utcita, zure burubari ba-carric beguiratcia. Asco aprove-chatuco dezu; munduco cuidado guztiyetatic libre conservatcen ba-cera. Asco faltatuco dezu, mun-duco gauzaren bat asco estimatcen badezu. Ez dedilla izan zuretzat ez gauza andiric, ez altsuagoric, ez gustocoric; ezbada Jaungoicoa bacarric, edo Jaungoicoagandic datorrena. Ecer ezatzat iruquizazu

criaturetatic datorren consuelo guztiya. Jaungoicoa amatcen duen animac, Jaungoicoaz beco gauza guztiyac ecer ecian daucazqui. Bacarric Jaungoico eternoa, lecu guztiyetan dagoena, ta guztiyac betetcen dituena da animaren consueloa, ta biotceco alegriya guztiya, ta eguiyazcoa.

## 6 CAPITULOA.

### *Conciencia onaren alegriyaren gañian.*

Personà onaren gloriya conciencia onaren testimonioa da. Iruquizazu conciencia ona, ta beti izango dezu alegriya. Conciencia onac guztiz asco sufridezaque, ta trabajuetan guztiz alegrea da; Conciencia gaiztoa beti bildurtia, ta sosegu gabea da. Gozotoro descantsatuco cera, zure concienciac ecertan erreprenditcen ez bazaitu.

Etzaitecela alegratu, ezbada ondo eguiten dezunian. Gaiztoac ez dute iñoiz eguiyazco alegriyaric, ez dute ere sentitcen barrengo paqueric, cergatic, *ez da paqueric gaiztoentzat*, dio Jaungoicoac. Eta esaten badute ere; *paquean gaude, ez da gure gañera gaitcic etorrico; ta ¿ceñ atrebituco da guri gaitz eguitera?* ez diezazula sinistu, cergatic bat batian jaiquico da Jaungoicoaren aserrea, ta ecer ecera biurtuco dira ayen obrac, ta galduco dira ayen pensamentuac. Nequeetan alegratcia ez da gauza necosoa Jaungoicoa amatcen duenarentzat, cergatic, orrela alegratcia, edo gloriyatcia, Jesusen gurutcean gloriyatcia da. Alegriya, edo gloriya laburra da personagandic errecibitcen dana. Munducó alegriya tristurac beti acompañatcen du... Onen gloriya beren

conciencietan, ta ez persónen aboan. Justuen alegriya Jaungoicoagandic, ta Jaungoicoagan da; ta ayen poza eguiyagandic. Eguiyazco gloriya, ta beticoa deseatcen duenac, ez du mundu onetaco gloriyaz casoric eguiten, ta munduco gloriya billatcen duenac, edo biotz guztitic despreciatcen ez duenac, señale da, Ceruco gloriya guchiyago amatcen duela. Biotceco sosegu andiya du ez alabantzaz, ta ez desprecioaz casoric eguiten ez duenac. Erraz contentu, ta sosegu egongo da biotz garbiya duena. Etcera santuagoa izango, alabatua izanagatic, ezta ere ceran baño guchiyagoa, despreciatua izanagatic. Cer ceran, ori cera, ta Jaungoicoaren beguiyetan ceran baño andiyagoa ecin esan zaitezque. Zure barrenen cer ceran beguiratcen baldin badezu, ez dezu

cuidadoric izango, persònac zugatic cer esaten duten. Persònac agueriyan dagoena icusten dute, baña Jaungoicoac biotcian dagoena. Persònac obrai beguiratcen diete, baña Jaungoicoac intencioai. Beti ondo eguiñ, ta orregatic ere bere buruba gauza guchiyan iruquitcia, anima humillaren señalea da. Criaturengandic consolatu nai ez izatia santidade andiyaren, ta barrengo confianzaren señalea da. Campotic bere alde testimonioric billatcen ez duena, claro dago, Jaungoicoaren vorondatera guztiro entregatu zala. Cergatic, *ez bere buruba alabatcen duena, ezbada Jaungoicoac alabatcen duena, da aprobatua*, dio San Pabloc. Bere barrenen Jaungoicoarequin tratatcia, ta mundu onetaco gaucetan aficioric ez iruquitcia, persònà espiritualaren izatia da.

## 7 CAPITULOA.

*Jesusi gauza guztiyaz gañian bear diogun amorioa.*

Zori onecoa da Jesus amatcia, ta bere burubá despreciatcia cer dan, entenditcen duena. Utci bear degu amantia amantiagatic, cergatic Jesusec bacarric naidu, gauza guztiyaz gañian gugandic amatua izan. Criaturen amorioa engañagarriya, ta aldacorra, Jesusen amorioa leyala, ta iraucorra. Criaturagaria arrimatcen dana, erorico da erorcorrarequin; Jesus artcen duena, sendoa eguingo da betico. Amazazu bada Jesus, ta zure adisquide iruquizazu, ceñac, beste guztiyac utciagatic ere, etzaitu utcico, ta ez du ere galtcia; ñoiz sufrituco. Guztiyengandic nai ta nai ez noizbait apartatu bearco dezu. Zaude Jesusequin vicitzan, ta erio-

tzan, ta encomenda zaitez aren leyaltasunera, ceñàc bacarric, guztiyac faltatuta, lagun dizaquezu. Jesus zure amantiac alaco izatea du, ce ez du berequin batian beste lagunic nai, ezbada beràc bacarric zure biotz guztiya iruqui nai du, ta Erreguea bezala zure biotcian bere tronu, edo jargoi propioan eseri nai du. Frantcico bacenuque ondo zuc zure biotza criatura guztiyetatic, gustora Jesus zure biotcian vicico litzaque. Jesusez campora paratcen dezun guztiya, galdua topatuco dezu. Ez dezazula ecer eza aiceac daraman lurrean confiatu; bada guizonà guztiya belucea da, ta aren gloriya guztiya belucearen gloriya bezala erorico da. Laster engañatuco cera persònen campoco ichurari bacarric beguiratcen badiozu; cergatic zure consueloa, ta erabaciya bestie-

tan billatcen badezu, caltea gueyagotan sentituco dezu. Guztiyetan Jesus billatcen badezu, topatuco dezu eguiyaz Jesus. Baña zure buruba billatcen badezu topatuco dezu ere zure buruba, baña zure calteraco. Mundu guztiya, ta etsai guztiyac baño caltegarriyagoa da personà bere burubarentzat, Jesus billatcen ez baldin badu.

## 8 CAPITULOA.

*Jesusen adisquidetasunaren gañian.*

Jesus gurequin dagoenian, guztiya ona da, ta ezda ecer gaitza iduritcen; baña Jesus gurequin ezdagoenian, gogorra da guztiyà. Jesusec gure barrenen itz eguiten ez duenian, despreciagarriya da consueloa, baña itz bacar bat ere eguiten duenian, consuelo andiya

sentitcen da. ¿Etzan venturaz Maria Magdalena negar eguin zuen lecutic bereala jaiqui, Martac esan cioiian, *Maisua dago emen, ta deitcen dizu?* ¡Zori oneco ordua, negarretatic espirituco consuelora Jesusec deitcen duenian! ¡Ceñ legorra, ta gogorra ceran Jesus gabe! ¡Ceñ zoroa, ta juicio guchicoa Jesusez campora ecer deseatcen badezu. ¿Venturàz ezda ori, mundu guztiya galduco baldin bacenuque baño, calte andiyagoa? ¿Cer valio dizaquezu Jesus gabe munduac? Jesus gabe egotia, ifernu gogorra da, ta Jesusequin egotia, paradiso gozoa. Jesus zurequin baldin badago, ez du ifiorc, zuri gaitcic eguiteco, indarric izango. Jesus topatcen duenac, tesororic dan onena topatcen du; ta Jesus galtcen duenac, guztiz asco, ta mundu guztiya baño gueyago galtcen

dú. Ecin gueyagoraño pobrea da Jesus gabe vici dana, ta ecin gueyagoraño aberatsa, Jesusequin ondo dagoena. Jaquinduriya andiya da, Jesusequin tratatcen jaquitia; ta Jesus berequin iruquitcen jaquitia, prudencia adiya. Izan zaitez humilla, ta paquetsua, ta Jesus zurequin izango da. Izan zaitez devotoa, ta sosegatua, ta Jesus zurequin guelditucо da.

Laster Jesusi igues eraguin diozaquezu, ta beraren graciya galdu dezaquezu, animaz campoco gaucetara aficionatcen bacera. Eta baldin Jesusi igues eraguiten badiozu, ta galtcen badezu ¿nor gana joango cera? ¿Ta nor billatuco dezu adisquidetzat? Adisquide gabe ecin vici zaitezque, ta ez baldin bada Jesus beste guztiyen aurretic zure adisquide, guztiz triste, ta desamparatua egongo cera. Ea

dezu bada juicioric, besteren batian confiatcen, edo alegratcen bacera. Lenago nai izan bear da, mundu guztiya etsai iruqui, Jesus ofenditua baño. Amatcen dituzun guztiyen artian bada, izan bedi Jesus zure adisquide especiala. Amatu bitez guztiyac Jesusgatic, baña Jesus beragatic. Jesusec bacarric especialqui amatua izan bear du, cergatic bera da beste adisquide guztiyac baño obea, ta leyalagoa. Beragatic, ta beragan nola adisquideac ala etsayac amatcitzu, ta abec guztiyacgatic erregutu bear dezu, guztiyac bera ezagutu, ta ama dezaten. Ez dezazula iñoiz bacarric alabatua, edo amatua izan nai, cergatic au, bere berdiñic ez duen Jaungoicoari bacarric tocatcen zayon gauza da. Ez dezazula ere nai norbait bere biotcian zurequin ocupatua izatia,

ta cerori ere etzaitecela iñoren amorioarequin ocupatu; ezbada Jesus izan bedi zugan, ta persona on guztiyetan. Egon zaitez libre, ta garbi barrendic criaturen aficio gabe. Preciso da, biotz garbiya, ta librea zuc iruquitcia, nai baldin badezu esperimentatu, ceñ atseguiña dan Jaungoicoa. Eta etcera eguiyaz onetara allegatuco, ez baldin bazaitzu beraren graciya aurreratcen, ta zurequin egoten; beste gauza guztiyac utcita, bacarric bacarrarequin bat eguin zaitecen. Cergatic Jaungoicoaren graciya personagana etortcen danian, orduan eroceñ gaucetaraco indartsua eguiten da; ta apartatcen baldin bada, orduan pobrea, ta eriya, ta alde aldean azoteraco utciya baicic izango ezda. Ezda gauza abetan animoa galdu bear, ta desesperatu bear, ezbada Jaungoi-

coaren vorondatera animo andiyarequin egon bear da, ta datocen neque guztiyac Jesusen honraraco ofrecitu bear dira, cergatic neguaren ondoren uda seguitcen da, arratsaren urrena eguna, ta ecaitzaren ondoren, dembora ederra.

## 9. CAPITULOA.

*Consueloric batere gabe egotiaren gañian.*

Ezda neque andiya munduco consueloa utcitcia, Jaungoicoarena badanian. Gauza andiya, ta guztiz andiya mundu onetaco, ta Jaungoicoaren consuelo gabe egonal izatia da, ta Jaungoicoaren honragatic biotceco destierroa pocic sufritu nai izatia, ta ecertan bere buruba ez billatcia, ta bere merecimentuai ez beguiratcia. ¿Cer gauza andiya da zu alegre, ta de-

votoa izatia, Jaungoicoaren graciya datorquizunian? Ordu deseagarriya da au guztientzat, gustora asco ibiltcen da Janngoicoaren graciyac eramaten duena ¿Eta cer arritcecoa da; ez baldin badu cargaric sentitcen, guztiya aldezaquenac eramaten duenàc, ta Maisuric dan jaquintsuenac videa, aurretic eracusten dionac? Consolatcen gaituen gauza gustatcen zaigu, ta berandu erantcitcen da personà bere buruàz. Ventzutu zuen San Llorenzoc mundua, ta bere Sacerdotea, cergatic munduan gusto eman cezaquien guztiya despreciatu zuen, ta chit asco amatcen zuen Sixto Aita Santua beragandic quentcea ere Jesusen amorés sufritcen zuen. Criadorearen amorioagatic bada guizonaren amorioa ventzutuzuen, ta nayago izan zuen Jaungoicoaren vorondatea cumplitua

izatia, mundu onetaco consueloa artu baño. Icasizazu zuc ere, bear dezun personen bat, ta asco nai diozunen bat Jesusen amorez utcitcen. Ez dezazula ere pena andiric artu, adisquideren batec utciyagatic, cergatic badaquizu, azquenian ere guztiyac bata bestiagandic apartatu bear degula. Asco, ta dembora lucian personác bere personàn peleatu bear du, bere buruba ondo ventzutcera allegatu orduco, ta bere aficio guztiyac Jaungoicoaganonz ipiñi orduco. Personà beregan dagoenian, erraz bere biotza munduco consueloetara macurtcen du; baña Jesusen eguiyazco amantia, ta virtuosoa danac, ezdu ipintcen biotza consueloetara, ta ezdu billatcen biotceco atseguintasunic, ezbadà penetan bere buruba egercitatcia, ta Jesusen amorez neque andiyac eramatia.

Ematen dizunian Jaungoicoac consuelo espirituala, errecibizazu, berari esquerrac emanaz, baña pensazazu, Jaungoicoaren errega-loa dala, ta etzaitzula, zorcitzaitzu-laco ematen. Etzaitecela arrotu, ta ez gueyegui gozatu, ezta ere vanidadez bete, ezbada humilla-goa eguin zaitez errecibitu de-zun erregaloagatic; conturzcoa-goa, ta bildurtiagoa zure obra guztiyetan, cergatic igaroco da ordu ura, ta etorrico da ten-tacioa. Quentcen zaitzunian con-sueloa, ez dezazula bereala dees-peratu, ezbada esperazazu humil-dade, ta pacienciarequin Ceruco visita, cergatic poderosoa da Jaun-goicoa, consuelo andiyagoa zuri ematecò. Ez da au gauza berriyu Jaungoicoaren videan esperimen-tatuentzat, cergatic Santu andi-yetan, ta anciñaco Profetetan as-

cotan izaten ciran onelace aldartiac; ta ala David Erregue Santuac Jaungoicoaren consucloarequin cegoenian esaten zuen: *Niç esan nuen nere ugariyan, ez naiz gueyago muguituco.* Ta guero consueloa faltatu citzayonian, cer esperimentatu zuen esaten du: *Apartatu cenuen nigandic zure arpeguiya, ta nere barrengo paquea galduric gueldìtu nintzan.* Etzuen orregatic bitartian iñoiz desesperatu, ezbada Jaungoiçoari gogoticago erregutcen cion esanaz: *Zuri deituco dizut, Jauna, ta nere Jaungoicoari erreguituco diot.* Azquenic bere oracioaren frutua atera zuen, ta Jaungoicoac entzun diola, publicatcen du esanaz: *Entzun ciran Jaungoicoac, ta erruquitu zan nitzaz; Jaungoicoa eguin zan nere laguntzalle.* Baña ¿cer gaucetan? Onetan: *Biurtu*

*aenidan nere negarra consuelora, ta inguratu nin duzun alegriyaz,* Onela guertatu baldin bada Santu andiyaquin, ez degu guc pobre, ta miserableac desesperatu bear, beñ devocio andiyarequin, beñ chiquiyarequin gueren burubac sentituagatic, cergatic espiritua joan ta etorri ibiltcen da, Jaungoicoac-gusto duen bezala. Orregatic dio Job Santuac. *Visitatcen dezu guizona goician, ta guchiyena uste danian probatcen dezu.* ¿Ceren gañian bada espera dezaquet, edo norgan confiatu bear det, ezbada Jaungoicoaren misericordia andiyan baçarric, ta Ceruco graciyaren esperanzan? Naiz izan ditecela nerequin person onac, naiz Erligioso devotoac, naiz adisquide leyàlac, naiz libru santuac, ta gusto andico gauzac daçartcitenac, naiz cantu atseguiñac, ta

Elizacoac, consuelo guchi ematen dirate abec guztiyac, Jaungoicoaren graciya atseguiña gabe, ta nere pobrezan uteiya baldin banago. Ezda orduan erremedio oberic, ezbada paciencia, ta Jaungoicoaren vorondatian nere buruba ucatcia. Ez det iñoiz aiñ onic, ta devotoric topatu, Jaungoicoaren graciya au noizbait faltatu etzayonic, edo devocioaren guchitcea, bere personan esperimentatu ez duenic. Ezda izan Santuric aiñ gora igoric, ta Jaungoicoagandic arguituric, lenago, edo gueroago tentatua izan ez danic. Cergatic ez da Jaungoicoaren contemplacio altuaren diña, animaco nequeren batian Jaungoicoagatic lenago egercitatua izan ez dana. Bada seguitcen dan consueloa, igaro dan tentacioaren seiñalea izaten da; cergatic tentacioctan probatuac

izan diranai prometitcen zaye Jaungoicoaren consueloa. *Ventzutzen duenari emango diot vicitzaco arbolatic jaten,* dio beràc. Nequéac sufritceco indarsuagoa eguiteco, ematen zayo cristavari Jaungoicoaren consueloa. Baita ere consueloaren ondoco tentacioa, duen onagatic soberbiaz bete ez dedin. Ezdu deabruac loric eguiten, araguiya ere ezda oraindic ill, ta ala ez dezu aspertu bear pelearaco prestatcen, cergatic iñoiz descantsatcen ez diran etsayac daude escoyetatic, ta ezquerretatic.

## 10 CAPITULOA.

*Jaungoicoari bere graciyagatic eguin bear zayon ezaguera, edo agradecimentuaren gañian.*

¿Cergatic billatcen dezu descantsua, nequeraco jayoa izanta? Pres-

ta zaitez pacienciaraco, consueloetaraco baño gueyago, ta alegriyaraco baño gueyago, gurutcea eramateco. ¿Ceñ munducoc ez luque pocic artuco consuelo espirituala, beti alcantza albalezaque? Cergatic consuelo espirituàlac munduco atseguin, ta araguiyaren gusto guztiyac baño andiyagoac, ta obeagoac dira. Cergatic munduco gusto guztiyac edo ecer servitcen ez dutenac, edo ciquiñac dira, baña animaco consueloac atseguiñac, ta garbiyac; virtutietatic sortuac, ta Jaungoicoac anima garbietara issuriyac. Ecin orregatic ere Jaungoicoaren consuelo abetzaz bere gustora iñorc goza dezaque, cergatic tentacio gabeco demborac ez du luzaro irauten. Asco eragozten du Ceruco consuelo onen etorrera biotceco libertade falsoac, ta bere burubaren confianza gueyeguiyac.

Jaungoicoac ondo eguiten du animaco consueloa ematiaz, baña personàc, gaizqui eguiten du, esquerrac emanaz, Jaungoicoari guztiya ez ezartciaz; ta orregatic graciyaren doayac gugana ecin etorri dira, cergatic esquer gaiztocoac guera Jaungoicoarentzat, ta ez diogu berari guztiya ezartcen. Cergatic beti zor zayo graciya bear bezala esquerrac ematen dituenari; ta humillari eman oi zayona, quenduco zayo soberboari. Ez det pecatuen damua quentcen diran consueloric nai: ez det ere deseatcen soberbiara eramaten duen Ceruco gauccn eráguerària; cergatic ezda gauza altu guztiya santua, ezta ere gozoa dan guztiya ona, ezta ere deseo guztiya garbiya, ezta ere gauza maitagarri guztiya Jaungoicoaren gustocoa. Gustora errecibitcen det beti humiltasuna, bildur-

tiyagoa; ta nere buruba utcitceco, prestagoa eguiñgo naben graciya.

Graciyaren doayarequin, ta aren faltarequin eracutsiya dana, ezda atrebituco, bere burubari gauz onic ezartcera, ezbada bere buruba pobre, ta ecer gabecotzat aitortuco du. Emayozu Jaungoicoari Jaungoicoarena dana, ta zure burubari zurea dana; au da, Jaungoicoari esquerrac bere graciyagatic, ta zuri, bacarric culpa, ta culpagatic merecci dan pena zortzaitzula pensazazu. Zure burubagatic beti danic guchiyena pensazazu, ta emango zaitzu danic andiyena; cergatic, danic andiyena ezdago danic chiquiyena gabe. Santuric andiyenac Jaungoicoaren beguiyetan, danic chiquiyenac dira berénetan, eta cembat ota alabantcen diña gueyago diran ambat eta humillagoac beren artian. Eguiyaz, ta Ceruco

gloriyaz beteac, ez dute munduco gloriyaric deseatcen. Jaungoicoagan cimendatuac, ta confirmatuac ecin soberboac izan ditezque. Eta errecibitu zuten on guztiya Jaungoicoari ezartcen-diotenac, ez dute batac besteagandic alabatuac izatia deseatcen, ezbada Jaungoicoagandic datorren alabantza bacarric nai dute, eta bèratan, ta Santu guztiyetan Jaungoicoa guztiyen gañian alábatua izatia, deseatcen dute, ta beti ori bera billatcen dute. Izan zaitez dan chiquiyenagatic esquer onecóa, ta andiyagoa errecibitceco diña eguingo cera. Iruquizazu ere dan chiquiyena dana andiyenetzat, ta despreciagarriyena doay anditzat. Ematen duenaren anditasuna consideratu esquero, ez da irurituco doay chiquiya, edo despreciyagarriya; cergatic ez da gauza chi-

quiya eciñ gueyagoraño andiya dan Jaungoicoac ematen duena. Penac, ta azoteac ematen baditu ere, gustora errecibitu bear dira, cergatic gure onagatic eguiten du beti, permititcen duen guztiya, guri etortcia. Jaungoicoaren graciya conservatcia deseatcen duenac, eman bitza esquerrac errecibitcen duenagatic, ta iruqui beza paciencia quentcen zayonagatic, eguin beza oracioa, graciya biurtceco, ta izan bedi contuzcoa, ta humilla, ez galtceco.

## 11 CAPITULOA.

*Jesusen gurutcearen amantiac cein guchi diran.*

Baditu Jesusec bere Ceruco erreinoaren amante asco, baña guchi bere gurutcearen eramantzalleac. Asco ditu consueloaren deseatzalleac, baña guchi penarenac.

Asco topatcen ditu mayeraco lagunac; baña guchi jan urriyarenac. Guztiyac deseatcen dute berarequin gozatcia, baña guchic beragatic ecer sufritu nai dute. Ascoc jarraitcen diote Jesusi oguiyaren particiaraño baña guchic pasioco caliza ecateraño. Ascoc erreverenciatcen dituzte aren milagroac, guchic guruzearen deshonraei seguitcen dituzte. Ascoc amatcen dute Jesus, nequeric guertatcen ezdan bitartian. Ascoc bera alabatcen, ta bedeicatcen dute beragandic consueloac errecibitcen dituzten bitartian; baña Jesus escutatcen baldin bada, ta pisca bat utciteen badítu, asitcen dira, edo queijatcen, edo animoaren faltan chit erorteen. Baña Jesus beragatic, ta ez consueloren bategatic amatcen dutenac, consueloric andiyenian bezala bedeicatcen dute

bera beren biotceco pena, ta neque guztiyetan ere. Eta iñoiz consueloric eman nai ez balioteque ere, orregatic ere, alabatuco luteque bera, ta beti esquerrac eman nai izango liozcateque. ¡O cembat alldezaquian Jesusen amorio garbiyac, bere conveniencia, edo amorio propioaz batere nastu gabeao! ¿Etzaye venturàz jornaleroen icena eman bear, beti consueloac billatcen dituztenai? ¿Ez dute venturàz adiscera ematen, Cristoren baño beren buruaren amantiagoac dirala, beren convenienciac, ta erabaciyac beti pensatcen dituztenac? ¿Non topatuco da Jaungoicoa duaric servitu nai duena? Guchitan topatcen da gauza guztietatic erantciya dagoen arimbateco personà espirituala. Cergatic, espirituz eguiyaz pobrea, ta creatura guztiyetatic erantcia

¿norc topatucó du? Urrutitic, ta azqueneco termino, edo chit urrutitic aren valioa. Emango baluque personàc bere ondasun guztiya ere, oraindic ecer ez da. Ta eguingo baluque penitenciya chit andiya ere, oraindic guchi da. Ta icasico baluque jaquinduriya guztiya ere oraindic urruti dago. Ta izango baluque virtute andiya, ta devocio guztiz santua ere, oraindic ascö falta zayo: au da, bere ecin gueyagorañó premiya duen gauza bat bacarra. ¿Cer ote da ori? Gauza guztiyac utciyaz gañera, bera ere utci dedilla, ta beragandic guztiro irten dedilla, ta bere amoriotic ez dezala batere iruqui. Ta eguin bear dituela ezagutcen dituen gauza guztiyac eguiten dituenian, pensabeza, ez duela ecer eguin. Ez dezala gauza anditzat iruqui, anditzat estima

ditequena; ezbada aitor beza eguiyaz bere buruba ecertaco ez dan servitzaritzat. Eguiyac berac dion bezala: *Aguindu zaizquitzuten gauza guztiyac eguiten dituzutenian; esazute; ecertaco ez gueran servitzariyac guera.* Orduan espirituz eguiyaz pobrea, ta biluzia izan diteque, ta Profeta Santuarequin esan dezaque: *Ceregana bacarra, ta pobrea naiz ni.* Ez orregatic ere iñor, onelacoa baño aberatsagoric, poderosoagoric, ta libreagoric, ceñac bere buruba, ta gauza guziyac utzitcen badaqui, ta danic guchiyenian jartcen.

## 12 CAPITULOA.

*Guruice santuaren vide seguruaren gañian.*

Gogorra iruritcen zaye ascori sermoi au: ucazazu zure buruba, ar-

tuzazu zure gurutcea, ta jarrai zayozu Jesusi. Baña gogorragoa izango da araco azqueneco itz ura entzutia: *Aparta zaitezte nigandic, madaricatuac, betico sura.* Oraiñ gustora entzuten, ta jarraitcen dutenac gurutcearen itza, orduan ez dute bildurric artuco betico condenacioa entzutetic. Gurutcearen señale au izango da Ceruan, Jauna juzgatcera datorrenian. Orduan gurutcearen servitzari, beren vicitzan Jesusi iduritu ciran guztiyac confianza andiyarequin allegatuco dira Cristo juezagana. ¿Cerc bildurtcen zaitu bada bera medio Ceruco erreinora joaten dan gurutcea eramaten? Gurutcean osasuna, gurutcean vicitza, gurutcean etsayetatic defensa; gurutcean Ceruco atseguintasunaren etorrera, gurutcean biotceco indarra, gurutcean espiritu̧co po-

za, gurutcean virtute guztiyac, gurutcean santutasunaren perfeccioa. Ezda animaco salvacioric, ta betico vicitzaren esperanzaric, ezbada gurutcean. Artuzazu bada zure gurutcea, jarraizayozu Jesusi, ta Cerura joango cera. Ura joan zan zure aurretic, gurutcea gañian artuta, ta zugatic iltzan, zuc ere zure gurutcea eraman dezazun, ta artan iltcia desea dezazun. Cergatic, Jesusequin iltcen bacera, berarequin ere vicico cera, ta penan laguna bacera, gloriyan ere izango cera. Orra; gurutcian, ta iltcian dago guztiya, ta ez dago vicitzaraco, ta animaco eguiyazco paqueraco beste videric, ezbada gurutce santaren, ta eguneroco mortificacioaren videa. Ibilli zaitez nai dezun lecuban, billazazu nai dezun guztiya, ta ez dezu vide altuagoric topatuco goyan, ta se-

guroagoric bean, ezbada gurutce santaren vidca.

Dispontcitzu gauza guztiyac zuc nai dezun, ta deritzatzun bezala, ta ez dezu topatuco, ezbada beti cerbait padecitu bear dala edo gogoz, edo gogoaren contra, ta ala beti gurutcea topatuco dezu. Edo gorputcian miña, edo gaitza sentituco dezu, edo animan espirituco nequea izango dezu. Batzuetan Jaungoicoac utcico zaitu, bestietan progimoac cer sufritu emango dizu, ta oraindic gueyago dana, ascotan: cerori zure burubarentzat necosoa izango cera. Ta orregatic ere ecin erremedio, edo consuelorea batequin libratua, edo alibiatua izango cera, ezbada Jaungoicoac nai duen artian, sufritu bearco dezu; cergatic Jaungoicoac, nequea consuelo gabe padeeitcen, zuc icastia nai du, berari guztiro

sujetatcia, ta nequea mediante humillagoa eguitia. Ez du iñorc aiñ biotcetic Jesusen pasioa sentitcen, nola onelaco gauzac padecitcia, guertatcen zayonac. Prest dago bada beti gurutcea, ta eroceñ lecutan ichoroten dizu. Eroceñ lecutara joanagatic ere, ecin argandic igues eguingo dezu, cergatic eroceñ lecutara allega zaitecela, zure buruba zurequin daramazu, ta beti cerori topatuco cera. Biurzaitez gora, biur zaitez bera, beguirazazu campora, beguirazazu barrena, ta abetan guztiyetan topatuco dezu gurutcea, ta lecu guztiyetan paciencia iruqui bearco dezu, animaco paquea izan nai badezu, ta betico coroa merecitu. Gurutcea gogoz eramaten badezu, eramango, ta guiyatuco zaitu deseatcen dezun azquenera, gueyago padecitu bear ez dic izango, ez dezu,

nera; munduan zauden bitartian orrelacoric ezbada ere. Gogo gaiztoz eramaten badezu, zure burubaren carga eguiten dezu, ta gueyago cargatcen cera, ta orregatic ere eraman bearco dezu. Gurutce bat utcitcen, edo botatcen badezu, beste bat duda gabe topatuco dezu, ta venturàz astunagoa. Munduan izan dan persònic ecin libratu izan danetic, ¿libratu uste dezu zuc? ¿Ceiñ Santu izan zan munduan gurutce, ta pena gabe? Etzan gure Jesu Cristo Jauna ere ordu batian badere pasioco penaric gabe egon, vicitu zan artian. *Convenì zan Cristoc padecitcia, ta illen artetic pistutcia, ta onela bere gloriyan sartcia, esan zuen beràc*; ¿ta nola zuc gurutce santaren vide erreal au utcita, beste videric billatcen dezu? Jesusen vicitza guztiya gurutcea, ta martirioa izan

zan, ta zuc zuretzat descantsua, ta consueloa billatcen dezu?

Uts eguiten dezu, utseguiten dezu nequea padecitcia beste gauzaric billatcen badezu, cergatic mundu onetaco vicitza au guztiya miseriyaz betea dago, ta alde guztiyetatic gurutcez señalatua. Eta cembat eta gueyago personàc espirituan aprovechatcen duen, ambat eta gurutce astunagoac ascotan topatcen ditu, cergatic aren destierroaren pena amoriotic gueyago gueitcen da. Baña orregatic ere aimbeste modutan afligitu au ezda consueloaren alibio gabe, cergatic ezagutcen du, frutu guztiz andiya datorquiola berc gurutcea paciencian eramatetic. Cergatic berari gogoz sugetatcen daniam, nequearen carga guztiya Jaungoicoaren consueloaren confianzan trucatcen da. Eta cembat eta ara-

guiyari pena dala medio indarrac gueyago galtcen zayozcan, ambat eta espiritua gueyago indarteen da Jaungoicoaren consueloa medio. Eta ascotan aimbeste indartcen da nequearen, ta penaren aficioz Jesusen gurutcearequin conformatceco amoréz, ce pena, ta nequeric gabe egon nai ez luque, cergatic ambat eta Jaungoicoaren gusto gueyagocoá dala iruritcen zayo, cembat ete neque gueyago, ta andiyagoac argatic sufritu alditzaquien. Ezda au personaren virtutia, ezbada Jesusen graciya; ceñàc aimbeste dezaque, ta eguiten du guizon argalian, ce beréz beti aborrecitcen, ta igues eguiten duena berà espirituco subarequin eguiten du, ta amateen du. Ezda guizonaren genioco gauza gurutcea eramatia, gurutcea amatcia, gorputza castigatcia, ta espirituari

sujetatcia, honraric nai ez izatia, falso testimonioac gustora sufritcia, bere buruba despreciatcia, ta despreciatua izatia deseatcia, neque, ta calte guztiyac pacienciaa eramatia, ta mundu onetan batere gauz onic ez deseatcia. Zure burubari beguiratcen badiozu, etcera gauz abetatic batere eguiteco gauza izango baña Jaunagan confiatcen badezu, emango zaitzu Cerutic indarra, ta zure vorondatera sujeto paraco dira mundua, ta araguiya; ez diozu ere zure etsai deabruari bildurric izango, fedeaz armaturic, ta gurutceaz señalaturic baldin bazaude.

Eguizu bada alegniña Jesusen servitzari on, ta leyalac bezala, zugatic crucificatua izandu zan bearen gurutcea animo andiyarequin eramateco. Presta zaitez neque, ta pena genero asco mundu

miserable onetan pacienciarequin eramateco, cergatic ala izango da zurequin, erocen lecutan egon zaitecela, ta ala topatuco dezu, erocen lecutan escutatuta ere. Conveni da ala izatia, ta ez dago pena, ta nequeetatic escapatceco beste videric, ezbada zuc zure buruba pacienciarequin sufritcia. Jaunaren caliza gogoz erazu, beraren adisquidea izan, ta berarequin parte izan nai badezu. Utcitzatzu consueloac Jaungoicoaren escuetan, eguin dezala oriyequin berac gusto duena; presta zaitez zu, nequeac sufritceco, ta iruquitzatzu consuelo guztiz anditzat; cergatic mundu onetaco nequeac ez dira Ceruco gloriya merecitceco diña, mundu onetaco pena guztiyac zuc bacarric, padecitu albacenitzaque ere. Allegatcen ceranian nequea atseguiña iruritcera, ta Jesusen a-

amorez gustatceera, orduan ondo zaudela, pensazazu, cergatic paradisoa topatu dezu mundu onetan. Padecitceac nequea ematen dizun bitartian gaizqui pasatuco dezu, ta leroceñ lecutara joan zaitecela, nequeac jarraituco dizu. Jartcen bacera izan bear dezunera, au da padecitcera, ta zure burubarentzat ilicera, zure nequeac laster igaroco dira, ta paquea topatuco dezu. San Pablo bezala irugarren Cerurano igoa baldin baciñaque ere, etciñaque nequeac padecitcetic libre egongo. *Nic eracutsico diot, nigatic cembat padecitu bear duen*; dio Jesusec. Padecitu bearco dezu bada, Jesus amatu, ta beti servitu nai baldin badezu. Ojala Jesusen icenian cerbait padecitceco diña baldin baciña, ceñ gloriya andiya izango cenuquien, cer consueloa Jaungoicoaren Santu guztientzat, ta cer egemploa progimoarentzat!

Guztiac alabatceu dute paciencia; guchic padecitu nai baldin badu ere. Arrazoy litzaque, zuc, Jesusen amoréz guchi bat padecitcia, ascòc gauza andiyagoac munduagatic padecitcen dituztelaric. Iruquizazu gauza ciertotzat, vici cerala, zure burubarentzat iltcia conveni zaitzula. Eta cembat eta bere burubarentzat persona gueyago iltcen dan, ambat eta gueyago Jaungoicoarentzat vicitcen asitcen da. Eciñ iñorc Ceruco gauzac comprendi ditzaque, ez baldin bada bumiltcen Jesusgatic nequeac sufritcera. Ezda mundu onetan Jaungoiçoaren gusto gueyagoco gauzaric, ta zuretzat provechugarriyacoric, Jesusgatic gustora padecitcia baño. Eta zure anqueran baldin balegoque, gueyago deseatu bear cenuque, Jesusgatic nequeac padecitcia, consueloac gozatceu egotia baño, cergatic Jesusen antz gue-

yagocoa izango ciñaque, ta Santu guztiyai gueyago irurituco ciñaque. Cergatic ezdago gure merecimentua, ta provechua atseguintasun, ta consuelo asco izatean, ezbada neque, ta pena andiyac pacienciarequin sufritcean. Cergatic, padecitcia baño gauza obeagoric, ta provechugarriyagoric guretzat izan baldin bazan, Jesusec duda gabe bere egemplo, ta itzaquin eracutsico cigun. Cergatic, berari jarraitcen cioten discipuloac, ta berari seguitu deseo zuten guztiyac claro consejatcen ditu gurutcea eramatera, ta esaten du. *Nere ondoren inorc etorri nai baldin badu, uca beza bere buruba, ta artu beza bere gurutcea, ta jarrai bizat.* Iracurri ezquero bada, ta guztiyac ondo beguiratu ezquero, izan bedi au acabera: *Cergatic, neque, ta pena asco dala medio conveni da, gu Jaungoicoaren erreinoan sartcia.*



VICI BEDI JESUS.

# JESUSEN IMITACIOCO

## IRUGARREN LIBRUBA.

Cergatic libru onetan beñ Jesusec, ta beñ Cristabac itz eguiten duten, orregatic noiz bacoitzac itz eguiten duen obeto ezagutceco, Jesusec itz eguiten duenian ipiñico det aurretic *J*, ta Cristabac itz eguiten duenian, *C*.

### 1 CAPITULOA.

*Jesusec anima leyalarequin duen barrengo conversacioaren gañian.*

*Entzungo det, cer itz eguiten duen nigan Jaungoicoac.* Zori onecoa Jauna beregan itz eguiten sen-

aitceri duen anima, ta aren abotic consueloaren itza errecibitcen duena. Zori onecòac Jaungoicoaren conversacioaren soñua entzuten dutérac, ta mundu onetaco conversacioaz casoric eguiten ez duténac. Zori onecòac eguiyaz, ez campotic soñua eguiten duen voza, ezbada eracusten duen eguiya barrendic entzuten duténac. Zori onecòac campoco gaucetaraco ichi, ta barrengoetara beguiratcen duten beguiyac. Zori onecòac animaco gaucetara beguiratcen duténac, ta espirituco gauzac ezagutceco eguneroco egercicioac dirala medio gueyago, ta gueyago prestatcia procuratcen duténac. Zori onecòac, Jaungoicoarequin emplcatcia, ta munduco cuidado guztiyetatic beren burubac libratcia procuratcen duténac. Consideratceitzu gauz abec, cristau maitea,

ta ichitzatzu sentiduen ateac, Jaungoicoac zugan cer itz eguiten duen, entzun dezazun. Au esaten du zure amantiac: *Ni naiz zure osasuña, zure paquea, ta vicitza.* Guarda zaitez nigan, ta paquea topatuco dezu. Utcitzatzu igarotcen diran gauzac, ta billatcitzu beticoac. ¿Cer dira betico iraungo ez duten gauzac, ez bada engañagarriyac? ¿Eta cer laguntcen dute munduco criatura guztiyac, Jaungoicoac utcitcen bazaitu? Eguin zaitez bada beste gauza guztiyac utciric Jaungoicoaren gustocoa, ta leyala, eguiyazco zori ona logra dezazun.

## 2 CAPITULUA.

*Erreguitcen dio Cristaubac Jaungoicoari, biere animan itz eguitecoc*

*Itz eguizu Jauna, bada zure ser-*

*servitzariyac entzuten du. Zure servitzariya naiz ni, indazu adimentua, zure egwiyac jaquiteco.* Jnclinazazu nere biotza zure aboco itcetara, erori bedi intza bezala zure itza. Israeltarrac beste dembora batian esaten cioten Moysesi: Itz eguiguzu zuc, ta entzungo degu, ez dizagula itz eguin Jangoicoac, ill ez gaitecen. Ez orrela Jauna, ez det nic orrela erreguetcen; ezbada Samuel Profeta Santuac bezala humildade, ta deseo andiyarequin erregutcen dizut. *Itz eguizu, Jauna, bada zure servitzariyac entzuten du.* Ez dizadala Moysec, edo beste Profetaren batec itz eguiñ, ezbada zuc nere Jaun, eta Jaungoicoa, Profeta guztiyen arguitzallea, cergatic zuc bacarric ayec gabe bear dan bezala eracutsi dizadaquezu, baña ayec zu gabe ez dute ecer valieco. Itcen soñua

eguin dezatcque, baña espiritua ez dute ematen. Ederqui esaten dute, baña zu issillic zaudela, ez dute biotcic irazaquitcen. Ayec letrac eracusten dituzte, baña zuc letrac cer esan nai duten aguertcen dezu. Ayec Mysterioac esan eguiten dituzte, baña zuc nola diran aguertcen dezu. Ayec mandamentuac predicatu eguiten dituzte, baña zuc cumplitcen laguntcen dezu. Ayec videa eracutsi, baña zuc ibiltçeço indarra ematen dezu. Ayec eguiten dutena, campotic eguiten dute, baña zuc biòtzac eracutsi, ta arguitçen dituzu. Ayec campotic erregutcen dute, baña zuc lurra bera frutu emallea eguiten dezu. Ayec itzaquin deagar eguiten dute, baña zuc entzuten danac, cer esan nai duen, aditcera ematen dezu. Ez dizadala bada niri Moysec itz eguin, ezbada zuc nerè.

Jaun, eta Jaungoicoa, betico eguiya cerana, campotic bacarric consejatua izanta, barrendic berotu gabe guelditcen banaiz, venturaz ill ez nadin, ta fruturic gabea eguin ez nadin. Itz entzuna, baña cumplitu gabea, ni juzgatceco izan ez dedin; orobat, itz ezagutua, baña ez amatua, sinistua, baña ez guardatua. Itz eguizu bada Jauna, cergatic zure servitzariyac entzuten du, ta betico vicitzaco itzac dituzu. Itz eguin zadazu nere animoren crocesi consueloraco, ta vicitza guztiyaren emiendaraco, baña betico zure honra, alabanza, ta gloriyaraco.

## 3 CAPITULOA.

*Jaungoicoaren itzac humildadearequin entzun bear dirala; ta nola ascoc estimatcen ez dituzten.*

1. Entzuitzu, [illegible] maiteac;

nere itzac, itz guztiz atseguiñac, munduco Filosofo, ta jaquintsun guztiyen; itzai eraguiten diotenac, baita ere jaquinduriyari. Nere itzac *espiritua, ta vicitza dira,* ta ez dira guizonen entendimentu ichuari deritzan bezala estimateecoac. Ez dira personac vanidadez gusto artzeco, servitu bear dutenac ez bada issillic onzun bear dira, ta humildade, ta amorio andiyarequin errecibitu bear dira. *C. Zori onecoa, Jauna, zugandic eracutsiya dana, ta zure leguetic eracusten diozuna;* alibiatu dezazun egun gaiztoetan, ta munduan guztiro galdu ez dedin. *J.* Nic eracutsi nien Profetai asieratic, ta ez naiz oraindaño guztiyai itz eguiten gueldittcen, baña nere deyera asco gorrac, ta gogorrac dira. Asco niri baño gogo gueyagorequin aditcen diote munduari, errazago

seguitcen dute beren araguiyaren griña, nere gustoa baño. Munduac ecin iraun dezatequien gauzac, ta chiquiyac prometitcen ditu, ta ansiya andiyarequin, servitcen diote, nic ecin gueyagorañoac, ta betico ondasunac prometitcen ditut, ta orregatic ere persònen biotzac ez dira muguitcen. ¿Norc servitcen dit niri, munduari, ta aren jabeai servitcen zayen arimbateco cuidadoarequin? Lotsa zaitez Sydon, esaten du itzasoac. Ta motivea jaquin nai baldin badezu, entzun zazu: Empleo chiqui bategatic vide lucia igarotcen da, ta betico vicitzagatic ascoc doy doyà oñ bat bere lurretic jasotcen duten. Ondasun despreciagarriyac billatcen dira, peceta bategatic, ta ascotan guchiyagotic chis gaizqui aucitan ascotan jarduteen da; sostancirya gabeco gauzacgatic, ta ucber ececo

promesa bategatic eciñ gueyagorraño, egun, ta arrats necatcen da: baña ¡ò gauza lotsagarriya! Iñoiz acabatuco ezdan ondasunagatic, bear arimbat estimatu ecin ditequien sariyagatic, eciñ gueyagorraño honra, ta betico gloriyagatic ezda gogoric, neque pisca bat ere artceco. Lotsa zaitez bada servitzari nagui, ta quejosoa, ayec prestago daudelaco, beren anima galtceco gaucetaraco, zu erabazteco etaraco baño. Gueyago gozatcen dira ayec vanidaderaco zu eguiyaraco baño. Engañatcen ditu ayec ascotan beren esperanzac, baña nere promesac ezdu iñor engañatcen, ta nigan confiatcen duena, ezda iñoiz utsic gueldituen. Aguindu niona emango diot, ta esan nuena cumplituco diot; baña ¿nori? ill arteraño nere amorioan leyala irauten duenari. Ni onac diran

guztiyen premiyatzallea naiz, ta devoto guztiyen probatzalle sendoa. Escribitzatzu nere itzac zure biotcian, ta ez ditzatzula aztu, cergatic tentacioco demboran chit bearrac izango dira. Iracurtceco demboran entenditcen ez dezuna, Jaungoicoac bere graciyarequin visitatcen zaituenian, entendituco dezu. Bi modutan costumbratcen det nere escogituac visitatcia, tentacioarequin, ta consueloarequin; eta bi lecio egunero iracurten diezcatet, bat ayen vicioac erreprenditcen, ta bestea virtutietan aurreratcera exortatcen. Nere itzac dituelaric, desprecíatcen dituenac, badu norc juzgatu juicioco egunian.

*Devocioaren graciya escatceco.*

ORACIOA.

Maiz esan bear da oracio au

C. Nere Jauna, eta Jaungoicoa, nere on guztiyac zu cera. ¿Eta nor naiz ni,

zuri itz eguitera atrebitceco? Ni zure servitzaricho chit pobre, ta ar despreciyagarri bat naiz, ta daquidan baño, ta esatera atrebitcen naizan baño pobreagoa, ta despreciyagarriyagoa alere. Acorda zaitez orregatic ere, Jauna, ecer ez nazala, ecer ez derala, ta ecer ecin derala. Zu bacarric cera ona, justua, ta Santua; zuc guztiya dezaquezu guztiya ematen dezu, guztiya betetcen dezu, pecatuan dagoena bacarric utsic utcitcen dezula. Acorda zaitez zure misericordiaz, ta betezazu zure graciyaz nere biotza, nere obrac utsac izatia, nai ez baldin badezu. ¿Nola sufri dezaquet mundu miserable onetan nere bururba, zure misericordiac, ta graciyac indartcen ez banaute? Ez dezazula zure arpeguiya nigandic quendu nai; ez dezazula luzatu ni visitatcia, ez

dezazula zure consueloa apartatu nai, eguin ez dedin *uriç gabeco lurra bezala nere anima zuretzat.* Eracutsi zadazu, Jauna, zure vorondatia eguiten, eracutsi zadazu zure aurrian bear dan bezala, ta humildadearequin ibiltcen. Zu cera nere jaquinduriya, zuç eguiyaz ezagutcen nazu, ta ezagutu ninduzun ene mundua zan baño lenago, ta mundu onetan jayo baño lenago.

## 4 CAPITULOA.

### *Eguiyarequin, ta humildadearequin Jaungoicoaren beguiyetan ibilli bear dala.*

1. Servinazazu eguiyarequin, cristau maitea, ta biotz garbiyarequin, edo tolesgabecoarequin beti billanazazu. Ni eguiyarequin servitçen nabena, topadizo gaiztoetatic guardatua izango da, ta eguiyac engañatzalleetatic, ta gaiztoen mur-

amuracioetatic libratuco du. Eguiyac libratcen bazaitu, falta gabe libre egongo cera, ta ez dizute gufzon zoroen itzac cuidadoric emango. *C.* Eguiya da, Jauna; zuc diozun bezala: nigan eguin dedilla. Zure eguiyac eracutsi dizadala, beràc guarda nazala, ta zori oneco fiñeraño conservanazala. Beràc libranazala aficio gaizto guztiyetatic, ta bear ez dan amorio guztitic, ta biotceco libertade guztiyarequin zure servicioan ibillico naiz. *J.* Nic eracutsicò dizut cer diran ouac, ta nere gustocoac: Pensatcitzu zure pecatuac ayen damu, ta nai gabe andi batequin, eta ez dezazula zure obra onacgatic, ecer cerala pensatu. Pecatariya cera eguiyaz, ta pasio, edo aficio gaizto ascoz beteà. Zure partetic beti ecer ecera zuaz, laster erortcen cera, laster veutzutua izaten cera, laster barrengo pa-

quea galtcen dezu, laster animac campoco gaurretara zabalcen cera. Ez dezu ecer ere, vanidadez arrotceco gauzaric; baña bai zure buruba nondic despreciatù franco, cergatic comprendi dezaquezun bafio argalagoa cera. Ez daquizula bada eguiten dituzan gustiyetatic gauza andiric ecer meritu: Etzaitzu iruritu bear ecer ere gauza andiric, ez estimatceecoric, ez arritceecoric, ez, alabatcecoric. Ez da beticoa danaz campora, gauza andiric, eguiyaz alabatceecoric, ta deseatceecoric. Gusta bequizu betico eguiya beste gauza gustiyac baño gueyago, ta gorrotazazu beti zure ecin gueyagorañoco ecereza.

Ez dezazula ecer ere aimbeste bildur izan, aimbeste gorrotatu, ta aimbeste igues eguin, nola zure pecatuac, ceñac mundu onetaco gauzen calte gustiyac baño, pena

gueyago eman bear dute. Ez dabiltza asco bear bezala nere servicioan, ezbada curiosidadeac, ta soberbiyac governaturic, nere secretoac, edo gauza estaliyac jaquin nai dituzte, ta Jaungoicoaren gauza altuac entenditu, beren buruaz, ta beren salvacioaz caso guchi eguiten dutela. Onelacoac ascotan, beren soberbia, ta curiosidadea motivo nic contra eguiten dierela, tentacio, ta pecatu ascotan erortcen dira. Bildur izan citzu Jaungoicoaren juicioac, ta icara zaitza beraren aserreac. Ez dezazula Jaungoicoaren obraric esaminatu nai, ezbada, pensa citzu zure pecatuac, cembatetan erori ceran, ta cembat obra on eguin gabe utci dezun. Batzuec beren devocioa libruetan bacarric eramaten dute; beste batzuec imaginetan, beste batzuec berriz, campoco señaletan, ta figure-

tan. Batzuec ahoan badaucate, baña biotcian guchi. Badira beste asco entendimentuz arguituac, ta aficioz garbituac Ceruco gauzac beti billatcen dituztenac, gogo gaiztoz lurreco gauzac entzuten dituzte, gorputzaren necesidade, edo vicitceco premiya duenai, penarequin servitcen diete. Onelacoac sentitcen dute, espirituaren eguiyac ayetan cer itz eguiten duen, bada eracusten die lurreco gauzaç desprećiatcen, ta Cerucoac amatcen; munduaz casoric ez eguiten, ta egun, ta gau guztiyetan Cerua descatcen.

## 5 CAPITULOA.

*Jaungoicoaren amorioaren eguite miragarriyaren gañian.*

Oracio ederra. Esaun viotcetic ta maiz.

C. Bedeicatcen zaitut, Ceruco Aita, nere Jesu Cristo Jaunaren Aita, cergatic ni pobre onctzaz acordatu

nai izan dezu. ¡O misericordien Aita, consuelo guztiyaren Jaungoicoa! Esquerrac ematen dizquitzut, cergatic zure consueloric batere mereci ez derana, noizbait alegratcen nazun consuelo orrequin. Bedeicatcen ta glorificatcen zaitut beti zure Seme bacarrarequin, ta Espiritu Santuarequin, consolatzallea bera danarequin orañ, ta beti. Ea Jaun, eta Jaungoicoa, nere amante santua, zu nere biotcera etorri ezquero, poztuco dira nere errai guztiyac. Zu cera nere gloriya, ta biotzaren alegriya, zu nere esperanza, ta nere laguntzallea penaco egunian. Baña cergatic oraindic zure amorioan argala nagoen, ta perfeccio gabe virtutian, orregatic zugandic indartceco, ta consolatceco premiya det; visita nazazu bada ascotan, ta eracutsi nazazu doctrina santuaquin. Libra

nazazu pasio gaiztoetatic, ta garbinazazu bear ez diran aficio guztiyetatic, barrendic osatua, ta ondo garbitua naizala, zu amatceco egoquiya, padecitceco sendoa, ta irauteco iraucorra eguin nadin. *J.* Amorioa gauza andiya da, guztiro on andiya da, cenàc bacarric astuna dan guztiya ariña eguiten du, ta berdiña ez dan guztiya berdin sufritcen du; cergatic carga nequeric gabe eramaten du, ta miña, edo garratza dan guztiya gozoa eguiten du. Nere amorio nobleac gauza andiyac, ta perfecció gueyagocoac eguitera beti muguitcen du. Amorioac beti goronz joan nai du, ta ez du gauza ecer ezaquin gueldituta izan nai. Amorioac librea, ta munduco aficio guztiyetatic garbitua izan nai du, barrengo vista eragotzi ez daquion; munduco conveniencianen batega-

tic embarazatua izan ez dedin, edo nequeren bategatic erori ez dedin. Ezda amorioa baño gauza gozoagoric, indarsuagoric, altuagoric, zabalagoric, atseguiñagoric, beteagoric, ta oberic Ceruan, ta lurrian; cergatic amorioa Jaungoicoagandic jayozan, ta ecin ere Jaungoicoagan ezbada bestegan descantsa diteque. Amatoen, diuenac egatcen du, corritcen du, ta alegratcen da, librea da, ta ez du iñorc eragozten. Guztiya ematen du guztiyagatic, ta guztiya du guztiyetan, cergatic on guztiyen ganean, ta on guztiya beragandic jayotcen dan Jaungoicoagan descansatcen du. Ez du doayetara beguiratcen, ezbada doaya ematen duenagana gauza guztien gañian biurtcen da. Ez daqui amorioac ascotan moduric; ezbada modu guztiyen gañ sutiutcen da. Amorioac ez du cargaric sentitcen,

ez du nequea ecertan iruquitcen, eguin dezaquien baño ere gueyago deseatcen du. Eciñ eguiñac ez du atceratcen, cergatic guztiya eguiteco indarra baduela, ta eguitia libre duela iruritcen zayo. Guztiraco bada da ona amorioa, ta cumplitcen, ta eguiten ditu asco gauza, ceñatan amorioric ez duena, animoa galduric, ecer eguin gabe gueldítcen da. Amorioac eguiten du bela, ta ló dagoela ere, esna dago, necatuagatic ére, ez da necatcen, barrenen estutuagatic ere, ez da estutcen, bildurtuagatic, ez du bere paquea galtcen, ezbada suaren garra, ta argui vici bat bezala goronz joaten da, ta cuidado gabe igarotcen da. Amatcen baldin badu iñorc, entendituco du cer esaten duen voz onec. Dey andiya da Jaungoicoaren belarrietan animaren afecto sutuba bera,

esaten duena: nere Jaungoicoa, nere amorioa, zu guztiya nerea, ta ni guztiya zurea.

C. Aci nazazu, Jauna, amorioan, icasi dezadan biotceco barrengo-aboarequin gustatcen, ceñ gozoa dan amatcia, ta amorioan urtutcia, ta igueri eguitia. Iruqui naza amorioac barrengo subaren, ta orretzaz arrituric egonaren poderioz, nere gañ joaten nazala. Canta dezadala nic amorioaren canta, jarrai dizazurala gora, nere amantia, acaba bedi zure alabanzan nere anima, amorioz pozturic. Ama zaitzadala nerau baño gueyago, ta ez nadilla nerau ere zugatic ez bada bestela amatu, ta zu eguiyaz amatcen zaituzten guztiyac ere Oracio ederra

zugan, zugandic datorren amorioaren leguéac aguintcen duen bezala. J. Amorioa viciya, tolesgabea, errucariotsoa, gustosoa, ta alegrea da, sendoa, sufritua, leyala, prudentia, ta biotz andicoa, ez du ere bere buruba billatcen, cergatic, non billatcen duen bacoitzac bere buruba, an amoriotic erortcen da. Amorioa, ondo beguiratua, humilla, ta zucena da, ez delicadua, ta erregalatua, ta gauza zoroetan empleatcen dana. Jan, eranian templatua, edo bear dan moducoa, castua, edo garbiya, iraucorra, sosegatua, ta sentidu guztiyetan mortificatua. Amorioa humilla, ta obedientia da bere aguintariai, bertzat despreciatua, ta ecer eza, Jaungoicoarentzat devotoa, ta ezquer onecoa, confianza, ta esperanza beti argan duela, beraren consuelo gabe dagoenian.

ere, cergatic penaric gabe ezda amorioan vicitcen. Erocen gauza padecitceco, ta amantiaren vorondatera egoteco, prest ez dagoenac, ezdu mereci Jaungoicoaren amatzallia deitcia. Preciso da amatcen duenac gauza gogor, ta samiñ guztiyac amatcen duenagatic gustora artcia, ta ezdu, guertatcen zayozcan nequeacgatic, argandic apartatu bear.

## 6 CAPITULOA.

*Eguiyazco amantiaren pruebaren gañian.*

J. Cristau nere maitea, etcera oraindic amante sendoa, ta prudentia. *C.* ¿Cergatic, Jauna? *J.* Cergatic guertatcen zaizquitzun nequeen pisca bategatic ere, asi cenituen, nere servicioco gaucetatic guelditcen cera, ta deseo chit

andiyarequin billatcen dezu consueloa. Amante sendoac firme irauten du tentacioetan, ta ez die sinismenic ematen etsayaren consejo maliciosoai. Neque, ta trabajuric ez danian, Jaungoicoaren gustocoa dan bezala, izan bear du ere neque ta trabajuco demboran. Amante prudenteac ez du aimbeste beguiratcen bera amatcen duenaren doaya, nola ematen duenaren amorioa. Gueyago beguiratcen dio vorondatiari gauzari baño, ta amatcen duena baño guchiyago, doay guztiyac estimatcen ditu. Amante noblea ezda doayan descansatcen, ezbada nigan doay guztiyen gañ. Ezdago orregatic ere guztiya galdua, nai cenuquien beceñ ondo noizbait nigatic, ta nere Santuacgatic juzgatcen ez badezu ere zure barrenen. Noizbait sentitcen dezun afecto on, ta atseguin ura, presenteco gra-

ciyaren obra da, ta Ceruco consueloac cer diran, alde aurretic cerbait esperimentatcia; baña ezda consuelo orretan gueyegui fiaturic egon bear, cergatic aiñ laster joaten da, nola etortcen dan. Peleazazu zure barrengo muguimentu gaistoen contra, ta deabruaren tentacioac despreciatcia virtute guztiz andiya, ta merecimentu andico gauza da. Etzaitecela bada eroceñ gogoracio modugatic bereala asaldatu, ez dezazula batere barrengo sosegua galdu. Guardazazu proposito sendoa, ta Jaungoicoagánaco biotz garbiya. Ezda ere engañioa, batzuetan Jaungoicoaren amorioan su, eguiñic bezala, ta bestietan biotzaren lenagoco oceṛ ezquerietara biurtuagatic, cergatic, orrelaco gauzac gogoaren contra eguiten zayen bitartian, merecitu eguiten da, ta ez galdu. Jaquiuzazu

ce deabruaren aleguin guztiya dala, zuri gauza oneraco deseoa eragoztia, ta obra santu guztiyetatic apartatcia, nolà diran Santuac honratcetic, nere pasioa consideratcetic, pecatuen oroipen provechugarritic, zure biotzari contu eguitetic, ta virtutian aurreratceco proposito firmetic. Ecartcen dizquitzu gogota pensamentu gaiztoac, zu gogoan jotceco, ta izutceco; oracio, ta lecio santutic aparta zaitzan. Pena andiya ematen dio confesio humillac, ta albaldin baluque, comuniotic ere apartatuco cinduque. Ez diozazula sinistu, ta caso'ric eguin, engañatceco lazoac ascotan zuri ipiñiagatic. Or compondedilla, gauza gaiztoac, ta ciquiñac zure burura ecartcen dituenian. Esayozu: Ua espiritu ciquiña, lotsatu ari, miserablea, ondo ciquiña aiz i, bada orrelaco

ciquinqueriyac nere buruRa ecartcen dituc. Apartari nìgandic, guezurti, ta embustero madaricatua, ez dec izango ic nigan batere parteric; ezbada Jesus nerequin egongo dec, guerrari indarsua bezala, ta i lotzaturic, ta cer eguin ezdaquicala egongo aiz: nayago diat ill, ta erocen̄ pena sufritu, ire gustoa eguin baño: ago issillic, ta mututu ari, ez diat gueyago casoric eguingo, gueyago, ta gueyago tentatcen ari bayaz erc. Esazu guero zure artian. *Jauna da nere arguiya, ta nere salvacioa; noren bildur izango naiz? Nere contra egercitoac jartcen baldin badira ere, ez da bilduntuco nere biotza. Jaun-*

Nola itz eguin bear zayon Deabruari tentacioan. Icasi bear litzaque memoriaz Jaungoicoari eskaten zayozcan itzaquin.

*na da nere laguntzallea, ta nere Erredentorea.* Peleazazu soldadu onac bezala, ta noizbait zure argaltasunagatic erortcen bacera ere artucitzu berecala lenagoco indarrac baño ere andiyagoac graciya gueyagoren confianzarequin, ta alde eguizu cuidado audiyarequin vanagloriya, ta soberbiyatic: onengatic asco engañatuac izaten dira; ta ascotan alde aldcan ecin erremediatu ditequien ichutasunian erortcen dira. Abisotzat, ta betico humildaderaco servitu bear dizu zuri, beren burubaz juicio gabe presumitcen duten soberboen erortce onec.

## 7 CAPITULOA.

*Nola Jaungoicoaren graciya humildadearequin gorde bear dan.*

1. Cristau maitea, provechugar-

riyagoa, ta seguruagoa da zuretzat devocioco graciya ezcutatcia, ez orregatic arrotcia ezta asco orren gañian itz eguitia, ta ez zure buruba asco estimatcia, ez bada gueyago zure buruba despreciatcia, ta mereci ez duenari emanaz bezala bildur izatia. Ezda onetan bear baño gueyago biotza ipiñi bear, cergatic lasterrago alda diteque contrariora. Graciyarequin zauden demboran pensazazu, ceñ miserablea, ta pobrea izaten ceran, graciya gabe zaudenian. Ezdago vicitza espiritualeco aurreratcea consueloco graciya izatean, ezbada aren falta humildadiarequin, zure burubaren desprecioarequin, ta pacienciarequin sufritcean, alaco moduan ece orduan oracioa, ta costumbratcen dituzun beste obra ònac utcitcen ez dituzula, ezbada aldezun, ta entenditcen dezun on-

doena zugan dana gogoz eguin dezazula. Eta sentitcen dezun animaco legortasun, edo penagatic etzaitecela zure burubaz guztiro descuidatu, cergatic asco dira, ondo ezdijoa quietenian, bereala paciencia galtcen dutenac, ta naguitcen diranac. Pensatu bear dezu, ezdagoela beti personaren escuban bere videa; ezbada Jaungoicoarena da ematia, ta consolatcia, beràc gusto duenian, ta cembat nai duen, ta ceñi nai dion, berari gustatcen zayon bezala, ta ez gueyago. Asco prudencia gabecoc devocioaren graciya zala motivo beren burubac galdu cituzten, cergatic eguin altcezatequien baño gueyago, eguiñ nai izan zuten, beren ecer eza consideratu gabe, ezbada, arrazoyaren juicioa baño gueyago, beren biotceco deseoa seguituaz. Eta cerga-

tic Jaungoicoac gusto zuen baño gauza andiyagoac eguitia presumitu zuten, orregatic graciya laster galdu zuten. Pobreac, ta despreciyagarriyac eguiñic gueldítu ciran, Ceruraño co gaucetara soberbiaz igo ciranac: orrela humillaturic, ta pobreturic icasi dezaten, ez beren indarretan, ezbada nere graciyan confiatcen.

Jaungoicoaren servicioan oraindic berriyac, ta esperimentatu gabeac diranac, erraz engañatu, ta galdu ditezque, personà prudentien consejuz gobernatcen ezbadira. Esperimentatuai sinistu baño, beren iritziya gueyago seguitu nai dutenac, gaizqui irteteco peligro andiyan jartcen dira. Beren burubac jaquintsuzat daucazquitenac, guchitan sufritcen dute bestegandic governatuac izatia. Obe da humildadearequin, ta ezaguera

chiquiyarequin guchi jaquin, soberbiarequin asco baño. Obe dezu guchi izan, soberbiaz bete zaitzacana, asco izan baño. Prudenciya guchi du alegriyara guztiya entregatcen danac, animaco lenagoco pobrezaz, ta Jaungoicoaren bildur garbiyaz azturic, bada onelaco bildurra duena, eman zayon graciya galtcia, beti bildur da. Ezdu ere chit ondo eguiten, nequeco, ta penaco demboran esperanzaren faltari bear baño gueyago lecu ematen dionac, ta bear baño confianza guchiyagorequin nigatic pensatcen duenac. Animaco paqueco demboran seguruegui egon nai duena, guerraco demboran ascotan animo guchicoa, ta bildurtiya da. Baldin bacenequi beti humilla, ta ecer eza zure estimacioan irauten, ta zure espiritua prudenciarequin governatcen, etci-

ſiaque erraz peligroan, ta pecatuan erorico. Conseju ona da : pensa dezazula devocioco graciarequin zaudenian, cer izango dan graciya ori faltatcen danian. Ta graciya ori faltatcian, pensazazu, biurtu ditequela berriz ori bera, ceña, zure abisoraco, ta nere honraraco pisca bateco quendu dizut. Provechugarriyagoa da ascotan orrelaco prueba, gauza guztiyac zure gustora izatia baño; cergatic, ez dira merecimentuac gueitcen icuste, edo animaco consuelo asco izatetic, edo Escrituretan jaquintsua izatetic, edo empleo altuagoan ipiñiya izanagatic, ez onelaco gauzacgatic; ezbada gueituco zayozca personari merecimentuac, eguiyazco humildadean cimentatua, ta Jaungoicoaren amorioz betea baldin bada; beti Jaungoicoaren honra bacarric billatcen

badu, ta bestiengandic ere honratua izatia baño, despreciatua, ta humillatua izatia nayago badu.

8 CAPITULOA.

*Jaungoicoaren beguiyetan bere buruba ecer ecian iruquitciaren gañian.*

C. Itz eguingo diot nere Jaunari naizan bezala, autza izanic ere. Nere buruba gueyagotzat baldiñ badaucat, orra, Jauna, zu nere contra zaude; ta nere pecatuac eguiyazco testimonioa ematen dute, ta eciñ contra eguiñ dezaquet. Baña nerau despreciatcen baldin banaiz, ta ecer ecera biurtcen banaiz, ta nere burubaz batere estimacioric ez badet, ta naizan bezala autz biurtcen banaiz, zure graciyac lagunduco dit, zure arguiya nere biotzari aldefatuco zayo, ta

estimacioric chiquiena ere nere ecer ecian itoco da, ta betico galduco da. An aguertuco nazu nerau niri, cer naizan, cer izan nintzan, ta certara etorri nazan, cergatic ecer ez naiz, ta ez nequien. Nere burubari utciya baldin banaiz, orra, guztiya ecer eza, ta miseriya; baña batian zuc beguiratcen badirazu, bercala sendo eguiten naiz, ta consuelo berriyaz betetcen naiz. Eta guztiz arritcecoa da, ni nere astuntasunaz beti lurrera eramana naizana, zugandic bat batian jasoa, ta misericordiyaz añ andiyarequin zugandic errecibitua naizala. Zure amorioac eguiten du, au, zure graciyarequin aurreratcen nazquidala, ta aimbeste premiyetan socorritcen nazula, peligro andiyetatic ere guardatcen nazula, ta eguiya esateco, ecin contala gaitcetic libratcen na-

zula. Nere buruba gaizqui amatuaz bada galdu nintzan, ta zu bacarric billatuaz, ta garbiro amatuaz, nere buruba, ta zu topatu nituen. ta amoriotic gueyago ecer ecera biurtu nintzan. Cergatic, zuc, ¡ó guztiz atseguiña! nic mereci baño gueyago, ta esperatcera, ta escatcera atrebitcen naizan baño gueyago eguin dirazu. Bedeicatua izan zaitecela, nere Jaungoicoa, cergatic nic batere gauz onic mereci ez badet ere, zure prestuqueri, ta neurri gabeco ontasunac ez dira iñoiz gueldítcen, esquer gaiztocoai ere, ta zugandic apartatuac daudenai ere ondo eguiten. Biur gaitzatzu zugana, esquer ondecoac, humillac, ta devotoac izan gaitecen, bada zu cera gure osasuna, virtutea, ta indarra.

## 9 CAPITULOA.

*Gauza guztiyac Jaungoicoagana, guztiyen azquen fiña dan bezala zucendu bear ditugula.*

*1.* Cristau maitea, nic izan bear det zure fiñic andiyena, ta azquenecoa, zori onecoa izatia, eguiyaz deseatcen badezu. Intencio onequin garbituco da zure deseoa, zure burubagana, ta criaturetara ascotan gaizqui macurtua. Cergatic, gauzaren batian zure buruba billatcen badezu, bereala zugan argaldu, ta devocioraco legortcen cera. Nigana bada guztiyac principalqui chussentcitzu, cergatic, ni naiz guztiyac eman nituena. Nigandic irtennai bezala, gauza guztiyai beguira zayezu, ta orregatic nigana beren iturrira bezala chussendu bear dira. Nigandic chiquiyac, ta andiyac, po-

breac, ta aberatsac iturri vicitic bezala ur viciya artcen dute, ta niri gogoz, ta vorondatez servitcen diratenac, graciya graciyagatic artuco dute. Baña nitzaz campora gloriatu nai duena, edo criaturen amorioren batian, ezda eguiyazco consueloan egongo, ezda ere biotceco soseguarequin, ezbada ascotan galduco du, ta penatuco da. Ez diozu baba aure burubari gauza onic egotci bear, ezta ere personen bati virtuteren bat, ezbada emayozu guztiya Jaungoicoari, ceña gabe ez du ecer personàc. Nic guztiya eman nuen, nic guztiya zuc iruquitcia nai det, ta esquerrac chit gogotic escatcen ditut. Au da eguiya, ceñer quiñ igues eraguiten zayo vanagloriyari. Eta sartcen bada Ceruco graciya, ta eguiyazco amorioa, ezda batere invidiaric izango, biotceco estutasunic, ta amorio

propioric ere ez. Cergatic Jaungoicoaren amorioac guztiyac ventzuten ditu, ta animaren indar guztiyac zabaltcen ditu. Gauzai bear bezala beguiratcen badiezu, nigan bacarric gozatuco cera, ta esperatuco dezu, cergatic ezda iñor onic, ezbada Jaungoicoa bacarric, ceña gauza guztiyen gañian alabatu, ta guztiyetan bedeicatu bearda.

## 10 CAPITULOA.

*Mundua despreciatuta Jaungoicoa servitcia gauza atseguiña dala.*

C. Berriz orain itz eguingo det, Jauna, ta ez naiz issillic egongo. Esango det nere Jaun, ta Jaungoicoaren, ta Ceruco nere Erreguereren belarrietan. ¡O ceñ andiya dan Jauna, zure bildurrecoentzat gordea daucazun gozotasunaren asco izana! Baña, amatcen zaituz-

tenentzat cer cera? ¿Cer, biotz guztitic servitcen zaituztenentzat? Ecin esan ditequena da duda gabe, amatceen zaituztenai ematen diezun zure contemplacioco gozotasuna. Onetan batez ere eracutsi ceñi dan zure amorioaren gozotasuna, cergatic ez nintzala, eguin ninduzun, ta zugandic guztiz aparte nembillela, zu servitcera ecarri ninduzun, ta amatceco aguindu ceñidan. ¡O betico amorioaren iturriya! ¿Cer esaingo det zugatic? ¿Nola aztu ninteque zutzaz, nitzaz acordatu nai izan dezunaz, galdu nintzan ezqueroz ere? Esperantza guciaz gañetic eguin cenuen misericordiya zure servitzariarequin, ta batere mereci gabe graciya, ta adisquidetasuna eman cenion. ¿Cer emango dizut graciya onegatic, cergatic etzaye guztiyai eman mundaco gauza guztiyac utciric, mun-

dua despeituric Erligioco vicitza artutcia? ¿Gauza andiya da venturaz nic zu servitcia? ¿Zu, ceña servitcera criatura guztiyac obligatuac dauden? Etzait iruritu bear gauz andiya eguiten derala, zu servitcian, ta Erligioco vicitza artcian, ezbada au gauza andiya iruritcen zait; ni aiñ pobrea, ta merecimenturic gabea zure servitzaritzat artu, ta zure adisquidien artian contatua nai izatia. Orra, Jauna, zureac dira nic dituran guztiyac, ta zu servitceco valiatcen naizan guztiyac. Baña orregatic ere contrara, zuc gueyago servitcen nazu ni, nic zu baño. Orra, Ceruac, ta lurrac guizonaren serviciorraco eguin cenituenac, prest daude, ta aguindu cenuen guztiya egunero eguiten dute; ta au guchi da; oraindic Aingueruac ere guizona servitceco eman cenituen;

Baña aben guztiyen gañ da, zuć cedorrec guizona servitu nai izan dezu, ta cerori emango ciñala prometitu cenion. ¿Cer emango det onembeste milla ondasungatic? Ojala zu servitu albacinzaquet nere vicitzaco egun guztiyetan. Ojala egun batian badere mereci dezún bezala servitu albacintzaquet. Eguiyaz zu servicio guztiyaren, honra guztiyaren, ta fin gabeco alabantcen diña cera. Eguiyaz nere Jabea cera, ta ni zure servitzari pobre bat, nere indar guztiyaquin zu servitcera obligatua nagoana, ta ez det iñoiz zure alabantcetan aspertu bear. Ala nai det, ala deseatcen det, ta niri falta zaidana zuc osazazu. Honra andiya, ta gloriya andiya zu servitcia, ta zugatic gauza guztiyac despreciatcia; cergatic graciya andiya izango dute zure servicio santura vorondatez

sujetatcen diranac. Onetzaz gañera, Espiritu Santuaren consuelo guztiz atseguiñà topatuco dute zure amorioagatic munduco atseguin guztiyac utcitcen dituztenac, ta onetzaz bat animaco libertade andiya, zure icenian vide estuan sartcen diranac, ta munduco cuidado guztiyac utcitcen dituztenac; ¡O Jaungoicoaren servicio gozo, ta atseguiña, ceña mediante persona eguiyaz librea, ta santua eguiten da! ¡O Erligioco servicioco estadu santua, personà Aingueruen iguala eguiten duena, Jaungoicoaren gustocoa; Demonioentzat izugarriya, ta cristau guztiyentzat estimatcecoa! ¡O artcia, ta beti descatcia mereci duen servicioa, ceñarequin onic andiyena merecitcen da, ta iñoiz acabatuco ez dan contentua logratcen da!

## 11 CAPITULOA.

### *Biotceco deseoac esaminatu bear dirala, ta bear dan modua para bear zayela.*

1. Cristau maitea, oraindic asco gauza ondó entenditu ez dituzunac icasi bear dituzu. *C.* ¿ Çer dira oriec, Jauna ? Ipiñi dezazula zure deseoa nere vorondatiaz bat ; eta zure burubaren amantia izan etzaitecela, ezbada nere vorondatia cumplitceco deseo andicoa. Ascotan irazaquitcen zaitue deseoac, ta gogotic muguitcén zaitue, baña beguirazazu, ea nere honragatic, edo zure provechuagatic, edò conveniènciagatic muguitceu ote ceran. Nigatic muguitcen baldin bacera, beti contentu egongo cera, erroceñ modutan nic disponituagatic ; baña zure provechuren bat deseo orretan ezcutatcen bada,

orra, orissen da zu eragozten, ta necatcen zaituena. Contu bada, ez dezazulá gucyegui confiatu ni consultatu gábe artu dezun deseoan, guero venturaz lenágo gustatu citzaitzuna, ta obeagotzat deseatu cenuena, damutu ez daquizun. Ezda bada ona diruricn deseo guztiya bereala cumplitu bear, ezta ere aren contrarioa bereala utci bear. Conveni da ascotan deseo onac mortificatcia, orien setagatic distraitu etzaitecen, prudenciaren faltagatic besteac escandalizatu ez ditzatzun, edo cergatic bestiac contra eguiten dizuten, bereala sosegua galdu, ta erori etzaitecen. Baña ascotan animo andiyarequin contra eguin bear zayo sentiduetatic sortcen dan deseoari, eta ezda casoric eguin bear, araguiyac eer nai duen, edo ez duen, ezbada aleguiña eguizu, nai ez duela ere,

espirituari sujeto egon dedin. Ta castigatu, ta obligatu bear dezu, espirituari sujetatcera, guztira prest jarri dedin arterano, ta guchirequin, ta erocen gauzarequin contentu izaten, ta edocen trabajuren contra batere musinic (*) ez eguiten icasi dezan arterano.

(*) It cez marmarizoa, esaten da

## 12 CAPITULOA.

*Paciencia cer dan, ta grina gaiztoen contraco pelearen ganian.*

*C.* Nere Jaun, eta Jaungoicoa, icusten deranez, chit bearra det paciencia, cergatic mundu onetan neque asco guertatcen dira. Bada erocen modutan pensa dezadala nere paquea gatic, ecin izanditeque nere vicitza guerra, ta neque gabe. *J.* Ala da, cristau maitea, bana

ez det nai, billa dezazun tentacio, edo nequeric gabe egon zaitezquien paquea ezbada pensazazu, neque ascorequin egercitatua, ta pena ascorequin probatua ceranian ere, topatu dezula paquea. Esaten baldin badezu, ecin zuc asco padecitu dezula, ¿nola guero sufrituco dezu purgatorioco suba? Bi gaitcetatic chiquiyena beti artu bear da. Igues eguin dezazun bada betico castiguetatic, procurazazu oraingo nequeac Jaungoicoagatic pacienciaz eramatia. Cer, ¿uste dezu mundu au seguitcen dutenac guchi, edo batere ez dutela padecitcen? Ez dezu bat bacarra ere orrelacoric topatuco, nai duten conveniencia guztiyetan vici diranen artian ere. Baña esango dezu; orrelacoac atseguin asco dituzte, ta beren gustoac cumpliteen dituzte, ta ala guchi sentitcen dituztela

beren nequeac. Baña nai duten guztiya izanagatic ere noiz arterraño orrec iraungo duela, uste dezu? Icusizazu cerbait, au entzunaz: *Quea bezala acabatuco dira munduco conveniencia andiyetacoac, ta ez da lenagoco consueloen oroipenic batere izango.* Baña ez dira vici diran artian ere, samintasunic, naigaberic, ta bildur gabe ayetan descantsatceen. Gustoa artcen duten gauzatic bertatic ascotan pena artcen dute. Ondo guertatcen zaye; bear ez dan bezala gustoac billatceen dituzten ezqueroz, ta jarraitcen ere dituzten ezqueroz, samintasunic, ta penaric gabe ayec ez cumplitcia. ¡O ceñ laburrac, ceñ guezurtiyac, ceñ gaiztoac, ta ceñ ciquiñac diran! Baña ayetan orditurie, ta ichuturic egonaren poderioz, ez dute ezagutceen, ezbada animalien guisa, acabatuco

dan mundu onetaco gusto pisca bategatic, animaco eriotza artcen dute. Baña zu, cristau maitea, *etzoitecela joan zure griña gasstoen ondoren, ta zure vorondatetic alde eguizu. Jaungoicoagan goza zaitez, ta emango dizu, zure biotzac escatcen diona.* Eguiyaz gozatu nai baldin badezu bada, ta nigandic gueyago consolatu, orra, munduco gaucen desprecioan, ta munduco consuelo guztiyac utcitcian izango da zure bendicioa, eta emango zaitzu ugari consueloa. Eta cembat eta gueyago criaturen consueloetatic apartatcen ceran, ambat nigan consuelo gozoagoac, ta indarsuagoac topatuco dituzu. Baña etcera lembician onetara, batallaco neque, ta pena pisca bat gabe allegatuco. Costumbre zar gaiztoàc contra eguingo du, baña costumbre obeagoarequin ventzu-

tuco da, murmuratuco du ara-guiyac, baña espirituco subarequin sujetatuco da. Tentatu, ta aserreracico dizu deabruac, baña oracioac igues eraguingo dio: orretzaz gañera, neque provechugarriyarequin ere ate andiya ichico zayo.

## 13 CAPITULOA.

*Jesusen egemplora mendeco humillaren obedienciaren gañian.*

1. Cristau maitea, obedienciatic bere buruba apartatu nai duena, bera apartatcen da Jaungoicoaren graciyatic, ta bere gàuzac izan nai dituenac, galtcen ditu guztiyenac. Bere aguintariai vorondatez, ta gustora sugetatcen ez dana, señale da, ez diola bere araguiyac bear bezala obeditcen, ezbada ascotan osticoac tiratcen, ta murmuratcen ducla. Icasizazu bada zure aguin-

tariai bereala sugetatcen, zure araguiya sugetatcia deseo baldin badezu. Cergatic lasterrago ventzutcen da campoco etsaya; barrengoa sugetatua dagoenian. Ezda zu zuretzat baño animaco etsai enfadagarriyagoric, ta gaiztoagoric espirituarequin ondo ez bazatoz. Preciso da zure burubaren desprecio eguiyazcoa artcia, zure araguiya ventzutu nai baldin badezu. Cergatic oraindic bear ez bezalá amatcen ceran, orregatic etcera erraz bestien vorondatera sujetatcen. Baña cer gauza andiya da zu autsa, ta ecer eza cerana, guizonaren vorondatera Jaungoicoagatic sujetatcia, ni guztiya aldezaquedana, guztiyetan andiyena, ta guztiyac ecer ecetic eguin nituena zugatic guizonari humil sujetatu nintzan ezquero? Guztiyetan humillena, ta chiquiyena eguin nintzan, zure

soberbia nere humildadearequin ventzutceco. Icasizazu obeditcen, autsa. Icasizazu humilltcen, lurra, ta guztiyen ompian egoten. Icasizazu zure vorondatia ucatcen, ta guztiro sujetatcen. Aserra zaitez zure contra, ta ez dezazula sufritu soberbiaric zugan vicitcia, ezbada alaco moduan sujeto, ta chiquiya aguer zaitez, ce guztiyac zure gañian ibilli ditezquela, ta loya bezala ompian erabilli zaitzaquetela. ¿Cer dezu, cer quejatu, guizon ecer eza? ¿Cer pecatari ciquiña, zure contra itz eguiten dutenai contra eguin diezaquezu zuc, aimbeste bider Jaungoicoa ofenditu dezun orrec, ta ascotan infernua merecitu dezuna? Baña barcatu nizun, cergatic valio andicoa da zure anima nere beguiyetan, ezagutu cenezan nere amorioa, ta nere mesedeai beti agradecitua vici

cintecen, ta procuratu cenezan beti eguiyazco sujeccioa, ta humildadea, ta zure desprecio propioa paciencian eraman cenezan.

## 14 CAPITULOA.

*Jaungoicoaren juicioac consideratu bear dituguila, gauz ònetan soberbiaz bete ez gaitecen.*

C. Turmioyaren guisa soñu eguiten dute, Jauna, nere gañian zure juicioac, bildur, ta icararequin jotcen dituzu nere ezur guztiyac, ta anima nerea guztiz icaratcen da. Cer igarotcen zaitadan ez daquidala nago, ta consideratcen det, ez dirala Ceruac garbiyac zure beguiyetan. Ainguerúetan gaiztaqueriya topatu bacenuen, ta barcatu ez bacenien, ¿cer izango da nitzaz? Ceruco izarrac erori ciran, ¿ta certan confiatcen det nic, au-

tsa izanic? Obra onic ezbada beitteric etzutela ciruritenac, lurreraño erori ciran, ta Jaungoicoaren consueloaquin gozatcen ciranac, icusi nituen munduco, edo sentiduen gusto ciquiñetan gozatcen. Ezda bada santidaderic, Jauna, zuc zure escuba apartatu ezquero. Ezdu valio batere jaquinduriyac, zuc gobernatcia utcitcen badezu. Ezdu valio indar andicoa izatiac, zuc conservatcia utcitcen badezu. Ezdago castidade seguruic, zuc defenditcen ezbadezu. Ezdu valio bere burubari guardiya eguitiac, zuc guardatcen ezbadezu. Cergatic, bacarric utci esquero, erortcen guera, ta galtcen guera. Aldacorrac guera bada, baña zugandic sendotuac izaten guera: epeltcen guera zure servicioan, baña zuc sututcen gaituzu. ¡O ceñ humil nere burubagatic pensatu bear

deran! ¡Ceñ gauza guchiyan iruqui bear naizan, gauz onen bat baderala usteagatic! O ceñ humil sugetatu bear naizan, Jauna, ecin comprendi ditezquien zure juicio ezcutuetara, ceñatan ez det beste gauzaric naizala topatcen, ezbada utsa, ta utsa, ecer ez. ¡O cargua neurri gabea! Itzaso ondo gabea, ceñian ez det nigatic beste gauzaric topatcen, ezbada guztiyan ecer eza. ¿Non egongo da bada ezcutatua, nere burubaz gloriyatceco, motivo chiquiren bat badere? ¿Non nere virtutiaren confianza? Itotcen da, Jauna, vanagloriya guztiya zure juicio ezcutuetan. ¿Cer dira persona guztiyac zure beguiyetan? ¿Arrotuco da venturaz lurra, eguiten duenaren contra? ¿Nola alchaditeque itz vanoaquin, Jaungoicoari eguiyaz sujetatu dan viotza? Cergatic ez da mundu guz-

tiyagatic arrotcen, beragana eguiyaz sujetatu zuena; ta alabantza guztiyacgatic ere ezda mugituco, bere esperanza guztiya Jaungoicoagan sendo para zuena. Cergatic, alabatcen dutenac berac ere, guztiyac ecer ezac dira, bada itcen soñua bezala berac ere acabatuco dira, baña *Jaunaren eguiyac beti iraungo du.*

## 15 CAPITULOA.

*Nola egon, ta itz eguin bear degun desiaditezquien gauza guztiyetan.*

I. Cristau maitea, esaten badezu gauza guztiyetan: Jauna zuc gusto dezun bezala au eguin bedi. Jauna, zure honraraco baldin bada, eguin bedi au zure icenian. Jauna, conveni zaitadala, ta provechugarriya izango derala; ezagutcen baldin

badezu, eman zadazu au zure honraraco usatzeco; baña caltegarriya izango dala, ta nere animaren provechucoa izango ez dala, baldin baderitzatzu, quenzazu nigandic deseo au; cergatic ez dira deseo guztiyac Espiritu Santuagandic datocenac, personari ònac dirala iruritzuagatic. Gaitz da ezagutcia espiritu onàc, edo gaiztoac muguitcen zaituen, au edo bestea deseatcera, edo zure amorio propioac muguitcen zaituen. Asco, lenbician espiritu onagandic muguituac cirala uste zutenac; azquenian engañatuac izan ciran. Orregatic bada beti Jaungoicoaren bildurrarequin, ta biotz-umillarequin deseatu, ta escatu bearda gogorateen dan gauza deseagarriya, ta bere (vorondatia) guztiro utciric; nere vorondatera, ta cuidadora, utci bear da; guztiya, ta

esan bearda: zuc daquizu, Jauna, nola au, edo bestea obeto dan; zuc gusto dezun bezala, emazu nai dezuna, cembat nai dezun, da noiz nai dezun: eguizu nerequin daquizun bezala, ta zuc gusto dezun bezala, ta zure honrari dagoquion bezala. Ipiñi nazazu nai dezun lecuban, ta eguizu libertadearequin gauza guztiyetan nitzaz nai dezuna. Zure escuban nago, gira, ta vueltatu nazazu inguruan; ona ni zure servitzaria guztiraco prest, cergatic, ez det neretzat vicitzia deseatcen, ezbada zuretzat; ojala bear dan bezala.

### *Jaungoicoaren gustoa beti eguitia alcantzatzeco.*

## ORACIOA.

Indazu, Jesus maitagarriya, zure graciya, nerequin izan dedin, ne-

requin trabajatu dezan, ta ill arterano nerequin iraun dezan. Indazu, Jauna, graciya, zuri gueyena gustátcen zaitzuna beti deseatceco, ta nai izateco. Zure vorondatea nerea izan dedilla, zurea beti segui dezadala, ta arequin bat chit ondo eguin dedilla. Zure, ta nere naya, ta nai eza bat izan ditecela, ta ecin ere zuc nai dezun, edo ez dezun beste gauzaric nic nai, edo ez nai dezaquedála. Indazu munduco gauza guztiyetaraco iltcia, despreciatua, ta ez ezagutua izatia, zure amorez amatcia. Indazu gauza deseagarri guztiyen gañ zugan descantsatcia, ta nere biotcian zugan sosegatcia. Zu bacarric cera biotceco paque, ta descantsu eguiyazcoa; zutzaz campora gogorrac, ta sosegu gabeac dira guztiyac. *Beragango paque onetan*, au da, zugan, ecin gue-

yagoraño betico onean lò eguin, ta descansatuco naiz. Amen.

## 16. CAPITULOA.

*Eguiyazco consueloa Jaungoicoagan bacarric billatu bear dala.*

C. Nere consueloraco desiatcen, edo pensatcen deran guztiya ez det emen espero, ezbada gueroco utcitcen det. Mundaco consuelo guztiyac nic baçarric baldin banituque ere, ta atseguin guztiyac gozatu albanezaque ere, jaquiña da, luzaro ecin iraun dezatequela. Orregatic, nere anima, ecin osotoro, ta bear bezala consolatu, ta divertitu zaitezque, ezbada pobreen consolatzallea, ta humillen errecibitzallea dan Jaungoicoagan. Ichoronzazu pisca bat, nere anima, ichoronzazu Jaungoicoaren promesa, ta on guztiyac ugari izango

dituzu Ceruan. Emengo gauzac bear ez bezala deseatcen. baldin badituzu, Cerucoac galduco, dituzu. Mundu onetaco gauzas usatu, ta Cerucoac deseatu eguin bear dituzu. Ecin ase zaitezque munduco gauzaquin, cergatic abec gozateco sortua izan etciñan. Munduco gauza on guztiyac izango baldin baceituque ere, ecin izan cintezque zori onecoa, ezbada gauza guztiyac sortu cituen Jaungoicoagan dago zure zori on guztiya; ez munduco amante zoroai iruritcen zayen, ta ayengandic alabatua dan bezalacoa, ezbada nolacoa esperatcen duten Jesusen cristau ònac, persona espiritualac, ta biotz garbicòac; ta Ceruco gaucetan beren conversacioa dutenac, ascotan gustatcen duten bezalacoa. Zòroa, ta laburra da munduco consuelo guztiya. Consuelo zori onecoa, ta eguiyazo

coa barrenen eguiyagandic sentitcen dana da. Personà devotoàc berequiñ darabil beti bere consolatzallea, ceña dan Jesus, ta esaten dio: Izan zaitez nerequin, Jesus, lecu, ta dembora guztiyetan. Au izan dedilla nere consueloa, munduco consueloric batere gabe gustora egon nai izatia. Eta zure consueloa faltatcen bazait, servi dizadala consuelo guztiz anditzat zure vorondatiac, ta consueloaren faltarequin ematen dirazun prueba justuac, cergatic etcera betico aserratuco, ez dezu ere betico queiñatuco, edo amenazaturo.

## 17 CAPITULOA.

*Jaungoicoagan ipiñi bear dala cuidado guztiya.*

J. Cristau maitea, utcizadazu zurequin nic nai derana eguiten, nic daquit zuri cer conveni zaitzun.

Guizonàc bezala pensatcen dezu zuc, ta asco gaucetan zure iritziya, zure pasioac consejatcen duen bezalacoa da. *C.* Eguiya da, Jauna, esaten dezuna. Andiyagoa da zuc nitzaz dezun cuidadoa, neronec izan dezaquedana baño. Erortceco peligro andiyan dago bere cuidado guztiya zugan ipintcen ez duena. Jauna, nere vorondatea chussen, ta firme zuganaco iraun ezquero, eguizu nitzaz nai dezun guztiya; cergatic ecin ona baicic izan diteque zuc nitzaz eguiten dezuna. Ni illumbetan egotia nai baldin badezu, bedeicatua izan zaitecelà, arguitan egotia nai baldin badezu, izan zaitez ere bedeicatua; nai baldin badezu penatua izatia, berdiñ, ala ere bedeicatua izan zaitecela beti. *J.* Cristáu maitea, orrela egon bear dezu, nerequin izan nai badezu. Ain prest egon

bear dezu padecitceco, nola alegratceco; aiñ gustora izan bear dezu pobrea, nola aberatsa. *C.* Jauna, gustora padecituco det zugatic, nigana etortcia nai dezun eroceñ gauza peñagarri; ain gustora artu nai det zure escutic ona, nola gaitza, aiñ gustora gauza samiña, nola gozoa, aiñ gustora tristea, nola alegrea, ta guertatcen zaitadan guztiyagatic esquerraç eman nai dizquitzut. Guardanazazu pecatu guztiyetatic, ta ez diot bildurric izango ez eriotzari, ta ez infernuari. Non ta zugandic betico botatcen ez nazun, ta vicitzaco Librutic borratcen ez nazun, ez dirate calteric eguingo nere gañ etortcen *diran* neque guztiyac.

## 18 CAPITULOA.

### *Mundu onetaco miseriyac Jesusen imitaciora paciencian eraman bear dirala.*

J. Cristau maitea, jachi nintzan ni Cerutic zure salvacioagatic, cargatu nintzan zure miseriyaz, ez obligacioz, edo premiyaz, ezbada zure amorez, paciencia icasi cenazan, ta vicitza onetaco miseriyac enfadu gabe sufricinizan, cergatic, jayo nintzanetic gurutcean ill arterañо, cer sufritu faltatu etcizadan. Munduco gaucen falta andiya izan nuen, nigatic queja asco maiz entzun nituen, lotsac, ta desprecioac humil sufritu nituen, mesedeacgatic esquer gaiztoac errecibitu nituen, milagroacgatic gaizqui esateac, eracusteagatic erreprensioac. C. Jauna, cergatic zure vicitzan sufritua izan ciñan,

onetan batez ere zure Aitaren aguintia cumplitcen cenuela, arrazoi da nic, pecatari miserable onec zure vorondatea dan bezala, nerau pacienciarequin sufritcia, ta zuc gusto dezun artian, vicitza miserable onetaco carga nere salvacioagatic eramatia. Cergatic, necosoa sentitcen bada ere vicitza au, orregatic ere zure graciyarequin merecimentu andicoa eguin zan, ta zure, ta zure Santuen egemploarequin argalentzat eramangarriyagoa, ta honrosoagoa. Baita ere oraindic ascoz consolagarriyagoa Juduen leguean izan zan baño, ceñian oraindic Ceruco atea ichiya cegoen; ta bonra guchiyagocoa ere cirurien orduan Ceruco videac, cergatic guchic procuratcen zuten Ceruco erreinoa billatcia. Ta orduan justuac, ta salvatcecoac ciranac ere, ecin sartu citezquien

Ceruco gloriyan zure pasio santua, ta eriotza baño lenago. ¡O cembat esquer ematera obligatua nagoen, cergatic niri, ta beste cristau fiel guztiyai zure erreinoraco vide zucena, ta ona eracutsi nai izan diguzun! Cergatic, zure vicitza da gure videa, eta paciencia santutic gabiltza zugana, gure coroa ceran orrengana. Zu gure aurretic joan izan ez baciñan, ta eracutsi izan ez baciñigun; ¿norc jarraitciaz caso eguingo zuen? ¡Ay cembat urruti, ta atcera gueldituco liraquien zure egemplo andiyac beguiratuco ez balituzteque! Orra, oraindic epelac gaude aimbeste zure egemplo, ta doctrina entzun ezquero ere, ¿cer izango litzaque, ez baldin baguenuque zuri jarraitceco aimbeste argui?

## 19 CAPITULOA.

### *Injuriac sufritciaren gañian, ta ceñ dan eguiyaz sufritua.*

1. Cer itz eguiten dezu; cristau maitea? Utci zayozu quejatciari, nere, ta Santuen pasioa consideratu ezquero. Ez dezu oraindic viciya galtceraño padecitu. Consideratcen badituzu añ asco padecitu zutenac, aiñ gogotic tentatuac, ta penatuac izan ciranac, ta aimbeste modutara probatuac, ta egercitatuac, orien aldian guchi da zuc padecitcen dezuna. Bestien pena andiyagoaç ecarri bear dituzu bada gogora, zure ecer ezac errazago eramateco. Eta ez baldiñ bazaizquitzu zuri ecer ezac iruritcen, contu, ori zure pacienciaren faltaz izan ez dedin. Baña orregatic ere naiz chiquiyac, naiz andiyac izan ditecela, procurazazu guztiya pà-

cienciarequin eramatia. Cembat eta obeto prestatcen ceran padecitceco, ambat eta obeto eguiten dezu, ta gueyago merecituco dezu. Errazago ere sufrituco dezu animo andiya, ta costumbrea onetara paratu ezquero. Eta ez dezazula esan, eciñ nic onelacogandic au sufri dezaquet, ta ez ditut ere nic onelaco gauzac sufritu bear, cergatic calte andiya eguin dit, ta iñoiz pensatu ere ez nituenac asmatu dizquit; beste eroceñengandic gustora, ta pocic, padecitu bear derala icusten deran bezala, padecituco det. Juicio gabeço pensamentua da ori, ez pacienciaco virtutea, ta ez norgandic coroatua izan bear duen, consideratçen ez duena, ezbada gueyago beguiratcen ditu persònac, ta eguiten zayozcan agrabioac, edo videgabequeriyac. Ezda eguiyazco sufritua berari deritzan a-

rimbat besteric, ta berac gusto duenagandic ezbada bestegandic padecitu nai ez duena. Eguiazco sufrituac ez du beguiratcen, cer personagandic, ea bere Aguintariyagandic, edo igualagandic, edo chiquiyagoagandic, on, ta santuagandic, edo gaizto, ta picaro andiren batengandic padecitcen duen; ezbada, diferenciyaric gabe erocen criaturagandic, cembat, ta cembat modutara padecitu bearra guertatcen zayon, au guztiya Jaungoicoaren escutic gustora errecibitcen du; cergatic ecin igaro liteque Jaungoicoaren beguiyetan merecimenturic gabe beraren amorez padecitcen dan, dan gauzaric guchiyena ere. Egon zaitez bada, vitoriya izan nai badezu, libre, ta prest batallaraco. Eciñ allegatu zaitezque peleatu gabe, pacienciaren coroa erabaztera, ta

errecibitceera. Ez baldin badezu padecitu nai, ez dezu ere coroatu nai. Baña coroatua izatia deseo badezu, peleazazu gogotic, ta sufrizazu paciencíarequin. Nequeric gabe ezda descantsura joaten, ezta ere pelearic gabe vitoriyara allegatcen. *C.* Jauna, eguin bequit zure graciyarequin eguin dezaquedana, neréz ecin dezaquedala iruritcen zaidana. Ondo daquizu indar guchi derala sufritceco, ta bereala animoa galtcen zaidala, trabajuric dan chiquiyena etorri ezquero. Eguin bequit eroceñ neque amagarriya, ta deseagarriya zure amorioagatic, cergatic padecitcia, ta penatua izatia chit provechugarriya da nere animarentzat.

## 20 CAPITULOA.

*Personàc bere ecer ezaz eguiten duen aitormena, ta mundu onetaco miseriyen gañian.*

C. Aitortuco det nere contra nere pecatua; aitortuco dizut, Jauna, nere miseriya. Ascotan gauza chiquiya da niri animoa galtcen dirana, ta tristatcen nabena. Propontcen det sendo egótia, baña tentacio chiqui bat etortcian, asco penatcen naiz. Gauza guztiz despreciyagarri batetic ascotan tentacio andiya sortcen zait. Eta tentacioric ez deranian, cerbait seguru nagoela ustiagatic, beñ baño gueyagotan icusten naiz, aice chiqui bategandic ventzutua izateco zoriyan. Icusizazu bada, Jauna, nere guchi izana, ta argaltasuna, alde guztiyetatic zuri agueriya. Erruqui zaitez arren, ta aterana-

zazu Yoitatic, an josiric gueldilu ez nadin, ta beti desamparaturic. Au da ascotan penatcen nabena, ta zure aurrian lotsatcen nabena, añ erorcorra, tá eriya naizala, nere pasio gasstoai contra eguiteco. Ez baldin banaiz ere consentitcera allegatcen, orregatic ere enfadagarriya, ta penagarriya da neretzat ayen persecucioa, ta asco enfadatcen nau onela beti guerran vicitceac. Emendic ezagutcen det ondo nere miseriya, cergatic ascoz errazago sartcen dira beti imaginacio gaizto abec, joaten diran baño. Ojala, Israelgo Jaungoico guztiz sendoa, edo fuertea, ta anima leyàlen celoa dezuna, ojala beguiratuco baldin bacenuque zure servitzariyaren nequea, ta pena; ta lagun eguingo bacenioque dabillen lecu guztiyan. Indartu nazazu Ceruco indarrarequin, orain-

dic espirituagana guztiro sujetatua ez dagoen nere araguiyac ventzutu ez nazan, ceñaren contra beti peleatu bearco det, vicitza miserable onetan nagoen bitartian.

¡Ay, nolacoa dan vicitza au, ceñian ez dira miseriyac, ta nequeac falta, ceñian guztiya lazoz, ta etsayez betea dago, bada neque, edo tentacio batec alde eguin orduco, bestia dator; ta oraindic lenagocoac dirauela ere, beste asco etortcen dira, ta guchiyena uste danian alere! ¿Nola amatu diteque aimbeste samintasun, ta añ andiyac dituen, ta aimbeste miseriyetara sujeto dagoen vicitza au? ¿Eta nola deitcen zayo vicitza aimbeste eriotza, ta izurri sortcen duenari? ¿Eta orregatic ere amatcen da, ta artan gozatcia ascoc billatcen dute. Erreprenditcen da ascotan mundua; engañagarriya, ta vanoa dala,

ta orregatic ere ez da erraz utcitcen, cergatic araguiyaren griñac gueyegui aguintcen dute. Baña gauza batzuec amatcera tiratcen dute, ta bestiac despreciatcera. Tiratcen dute munduaren amoriora araguiyaren, ta mundu onetaco gaucen deseoac ta andinayac, baña abetatic sortcen diran penac, eta miseriyac, munduaren gorrotoa, ta enfadua sortcen dute. Baña ¡ay! ventzutcen du orregatic ere atseguintasun ecer ez batec mundura emana dagoen biotza; ta sentiduen mendean egotia consuelotzat iruquitcen du, cergatic Jaungoicoaren gozotasuna, ta virtutiaren barrengo alegriya étzuen ez icusi; ta ez probatu. Baña mundua bear bezala despreciatcen dutenac, ta Jaungoicoa biotz guztiarequin servitcia procuratcen dutenac, badaquite, mundua eguiyaz despre-

ciatcen dutenai, Jaungoicoac ematen dien animaco consueloa, ta claro icusten dute, ceñ gogotic munduac uts eguiten duen, ta cembat modutara engañatcen dan.

## 21 CAPITULOA.

*On, ta doai guztiyen gañ Jaungoicoagan descantsatu bear dala.*

Oracio ederra. Gauza guztiyen gañ, ta gauza guztiyetan Jaungoicoagan descantsatu bear dezu beti, nere anima, cergatic bera da Santuen betico descantsua. Indazu, nere Jesus guztiz gozoa, ta guztiz maitea, criatura guztiyen gañ zugan descantsatcia, osasun, ta edertasun guztiyen gañ, gloriya, ta honra guztiyen gañ, eguiñal, ta anditasun guztiyen

gañ, jaquinduriya, ta arguitasun guztiyen gañ, ondasun, ta habilidade guztiyen gañ, alegriya, ta poz guztiyen gañ, fama, ta alabanza guztiyen gañ, atseguintasun, ta consuelo guztiyen gañ, esperanza, ta promes guztiyen gañ, merecimentu, ta deseo guztiyen gañ, eman ditzaquezun doai, ta *erregalo* guztiyen gañ, animac artu, ta senti ditzaquen consuelo, ta poz guztiyen gañ; azquenic Aingueru, ta Arcangel guztiyen, ta Ceruco egercito gauza guztiyaren gañ; icusi ditezquien, ta ecin ditezquien, ta cerori etceran gauztiyen gañ. Cergatic, nere Jaun, eta Jaungoicoa, zu cera guztiyen gañ onena; zu bacarric guztiz andiya, zu bacarric guztiz poderosoa, zu bacarric ecin gueyagorañoguztiyentzat asco cerana, ta betea, zu bacarric guztiz gozoa, ta atseguiña; zu

bacarric guztiz ederra, ta maitagarriya; zu bacarric guztiz noblea, ta gloriosoa gauza guztiyen gañ, ceñian on guztiyac batian, ta perfeccioarequin daude, egon ciran, ta egongo dira, ta ala guchi da, ta bear dan arimbat ez dana zure burubaz campora niri ematen dirazuna, edo zugandic eracusten, edo prometitcen dirazuna, ez baldin bazaitut zu icusten, edo osotoro alcantzatcen. Cergatic ecin eguiyaz nere biotza descantsatu da, ezta ere guztiro contentatu, zugan descantsatcen ezbada, ta doai, ta criatura guztiyac igarotcen ezbaditu.

¡O Jesus nere esposo guztiz gozoa, amante guztiz garbiya, mundu guztiyaren jabea! O ¡norc emango lirazquien niri eguiyazco libertadeco egac, zugan egatceco, ta descantsatceco! O ¡ noiz emango zait niri Jaungoicoa osotoro servitcia,

ta icustea, ceñ atseguiña dan nere Jaun, eta Jaungoicoa! ¿Noiz bilduco ote naiz osotoro zugan zure amorioaren poderioz nere bururic ez sentitceco, ezbada zu bacarric pensatceco, ta sentitceco pensatce, ta modu guztiyen gañ, guztiyai ezaguna ezdan moduan. Baña orain maiz negar eguiten det, ta nere zori gaitza pena andiyarequin daramat, cergatic miseriyen valle onetan asco gaitz guertatcen dira, niri ascotan paquea galdu, tristatu, ta illuntcen nautenac. Ascotan eragozten, ta distraitcen naute, berenganonz tiratu, ta enredatcen naute, zugana allegatceco libre egon ez nadin, ta zure laztan atseguiñaz gozatu ez dezadan, ceñac gozatcen dituzten zori onecoac. Mugui zaitza arren nere negarrac, ta modu ascotaco penac. O Jesus betico gloriyaren arguiya,

gùre animen consueloa, zugan dago nere aboa vocic gabe, ta nere issillàc itz eguiten dizu. ¿Noiz arteraño luzatcen du etortcia nere Jaunac? Datorrelà nigana, bere pobrecho onengana, ta consoladezala; luza beza bere escuba, ta atera beza miserable au pena guztitic. Atoz atoz arren, cergatic zu gabe ezda izango iñoiz ez egun, ta ez ordu alegreric; cergatic zu cera nere alegriya, ta zu gabe utsa dago nere maya. Miserablea naiz, ta moduren batian presondeguiyan, ta grilluz cargaturic nago, zure presenciaren arguiyarequin mantendu, ta libertadian para nazazun artian, ta arpegui alaya ipiñi dirazazun artian. Escabezate besteac zugandic gusto duten beste erocen gauza, etzait niri bitartian beste gauzaric gustatcen, ezta ere gustatuco, ezbada zu, nere Jaungoi-

coa, nere esperanza, ta nere betico osasuna. Ez nait issilduco, ta escatcen aspertuco, zure graciya biurtu dedin arterañoo, ta zuc niri barrenen itz eguiñ arterañoo.

*J.* Ona non nagoen, ona ni zugana etorri, cergatic deitu dirazun. Zure negarrac, ta zure animaren deseoac, zure humillatciac, ta biotceco damuac, bigundu naute, ta zugana ecarri naute.

*C.* Deitu nizun, ta descatu nuen zutzaz gozatcia, zugatic guztiya despreciatceco prest. Cedorrec bada lembicico muguitu ninduzun, zu billatcera. Bedeicatua izan zaitecela bada Jauna, cergatic zure misericordiaren anditasunaz bat eguin cenuen ontasun au zure servitzariyarequin. ¿Cer du cer esan gueyago zure servitzariyac zure aurrian, ezbada humildu dedilla eciñ gueyagorañoo bere gaiz-

taqueri, ta ecer ezaz beti acordatcen dala? Cergatic ez da zure antcecoric Ceruco, ta lurreco gauza miragarri guztiyetan. Zure obrac guztiz ònac dira, zure juicioac eguiyazcoac, ta zure providenciac guztiyac governatcen ditu: Alabanza, ta gloriya bada zuri Aitaren jaquinduriya; zu alabatu, ta bedeicazaitzatela nere aboac, nere animac, ta criatura guztiyac batian.

## 22 CAPITULOA.

### *Jaungoicoaren mesedeen oroipenaren gañian.*

*C.* Iriquizazu, Jauna, nere biotza zure leguean, ta eracutsi zadazu zure mandamentuetan ibiltcen. Indazu zure vorondatia aditcera, ta errespeto, ta cuidado andiyarequin nola generalian, ala particularrian eguin dizquidatzun mesedeac go-

gora ecartcia, orrela zuri bear bezala esquerrac eman dizazquitzuran. Baña ezagutcen det, ta aitortcen det, dan chiquiyenagatic ere bear diran alabauzac ecin eman nintzaquizula. Eguin dizquidatzun mesede guztiyac baño chiquiyagoa naiz ni, ta zure prestuqueriya consideratcen deranian, orren anditasunaren poderioz nere espirituac faltatcen du. Animan, ta gorputcian, barrendic, ta campotic, natural, ta sobrenaturalmente, edo naturalaz gañ degun guztiya zure mesedea da, ta zu onguille piadoso, ta ontzat guztiyac aditcera ematen zaituzte. Eta batzuec asco, ta besteac guchiyago errecibitu badutere, zureac dira orregatic ere guztiyac, ta dan guchiyena ere zu gabe ecin izan diteque. Gueyago errecibitu dituena, eciñ bere merecimentuaz gloriatu diteque,

ta bestien gañ jaiqui; ezta ere guchiyago errecibitu duenari orregatic burla eguin; cergatic bere buruari guchiyena egozten diona, da andiyena, ta onena, ta Jaungoicoari esquerrac ematen humillagoa, ta devotoagoa. Eta guztiyac baño despreciagarriyagoa, ta guchiyena mereci duena dala, bere buruagatic pensatcen duena, prestatuago dago, andiyagoac errecibitceco. Baña guchiyago errecibitu duenac ezdu tristatu bear, ta bere barrenen enfadatu bear, ezta ere gueyago errecibitu duenari invidiaric artu; ezbada zuri gueyago beguiratu, ta zure ontasuna ecin gueyagorано alabatu bear du, añ ugari, añ vorondate utsez, ta gustora, persònaz diferenciaric eguin gabe, zure doayac ematen dituzulaco. Zugandic dira guztiyac, ta orregatic guztiyetan alabatua izan

bear dezu. Zuc daquizu bacoitzari conveni zayona ematen. Eta cergatic onec gueyago, ta besteac guchiyago duen, ezda ori gure eguitecoa, ezbada zurea, bacoitzaren merecimentuac ondo ezagutcen dituzunarena. Orregatic nere Jaungoicoa, ta jabe bacarra, mesede anditzat daucat ere ez izatia asco, ceñatatic campotic, ta guizonen iritziraco alabantza, ta gloriya aguertcen dan; alaco moduan izan bear degu ece bacoitzac bere pobreza, ta ecer eza consideratu, edo icusita, ez dedilla orregatic penatu, ezbada asco alegratu, cergatic zuc, Jauna, pobreac, ta humillac, ta munduraco despreciatuac, zure adisquide, ta echecotzat autu cenituen. Onen testigu dira zure Apostoloac bérac, céñac mundu guztico Principe eguin cenituen, orregatic ere ayecgatic gauza gaiz-

toric ecin esan citequien moduan vicitu ciran; ta añ humillac, ta malicia gabeac izan ciran, ce alegratcen ciran ere zure icenagatic falso testimonioac padecitceaz, ta munduac aborrecitcen duena, ayec gogo andiyarequin errecibitcen zuten. Ezda bada gauzaric zu amatcen zaituena, ta zure mesedeac ezagutcen dituena aimbeste alegratu bear duenic, nola zuc argan dezun vorondatia, ta artzaz eguitia eternidadetic gustatcen zaitzuna. Ta onetzaz aimbeste contentu, ta consuelo artu bear du, ce aiñ gustora nai duela izan chiquiyena, nola besteac andiyènac izatia deseatuco luquien; ta aiñ guztora, ta contentu egon bear du azqueneco lecuban, nola lembicicoan; ta añ gustora ecer eza, ta despreciyagarriya, ta batere icenic, ta famaric gabea, nola guztiyac baño

errespetagarriyagoa, ta andiyagoa. Cergatic zure vorondatiac, ta zure honraren amorioac guztiyai eraguiñ bear die, ta gueyago bera consolatu, ta gustatu bear du, eman zayozcan, ta emango zayozcan doay guztiyac baño.

## 23 CAPITULOA.

*Animáco paqueraco asco laguntcen duten lau gauzaren gañian.*

*J.* Cristau maitea, orañ eracutsico dizut paquearen, ta libertade eguiyazcoaren videa. *C.* Eguizu, Jauna, esaten dezuna; cergatic, gustatcen zait ori aditcia. *J.* Procurazazu zure vorondatia baño besterena lenago eguitia; nayago izan zazu beti guchiyago izan, asco baño: billázazu beti puesto, edo lecuric bajuena, ta guztiyai sujeto egotiá: deseazazu beti, ta erregu-

tuzazu, Jaungoicoaren vorondatia osotoro beti zugan cumpli dedilla. Orra, onelaco persona sartcen da paqueco, ta descantsuco videan. *C.* Jauna, zure sermoi labur onetan perfeccio andiya dago. Chiquiya da itretan, baña andiya aditcera ematen duenian, ta frutuan ugariya; cergatic nic perfeccioarequin au guardatuco banuque, ez nintzaque añ erraz turbatuco; bada sosegu gabe, ta penatua sentitcen naizan guztiyan, doctrina onetatic apartatu naizala, topatcen det; baña zuc guztiya aldezuna, ta animaren provechua beti amatcen dezuna, gueizadazu graciya, zure sermoya cumplituta, nere anima salvadezadan.

*Pensamentu gaiztoen contraco*

## ORACIOA.

Etzaitecela nigandic urruti joan,

nere Jaun, eta Jaungoicoa: lagunzadazu arren, cergatic nigan, asco pensamentu, ta bildur andiyac nere anima penatcen dutenac, jaiqui dira. ¿Nola calte gabe igaroco naiz? ¿Nola urratuco ditut, edo quenduco ditut? *J.* Joango naiz ni zure aurretic, ta humillatuco ditut munduco panfarroyac; iriquico ditut carcelaco ateac, emango dizut arguiya, ta nere gauzá ezcutuac cer esan nai duten, aditcera emangó dizut. *C.* Eguizu Jauna, diozun bezala, ta igues eguin bezate zu aguertciaz bat, pensamentu gaizto guztiyac. Au nere esperanza, ta consuelo bacarra; nere pena guztiyetan zugana igues eguitia, zugan confiatcia, zuri biotz guztitic deitcia, ta zure consueloa pacienciarequin ichorotia.

*Entendimentua arguitceco.*

## ORACIOA.

Argui nazazu, Jauna, barrengo arguiyarequin, ta quentcitzu nere animatic illuntasun guztiyac; quentcitzu nere distraccioac, ta quenzayezu ere indarra niri indar eguiten diraten tentacioai. Peleazazu gogotic nigatic zuc, ta ventzutcitzu nere griña gaiztoac, paquea nigan izan dedin, ta conciencia garbiyan zure alabanza ugari entzun dedin. Aguindu zayezu nere animari gaitz eguin nai dioten guztiyai, aren eguiyazco paquea galdu nai duten guztiyai, daudela gueldiric, ta au asco izango da nere zori oneraco. Biyalduzazu zure arguiya, ta eguiya lurraren gañera, nere gañera, cergatic utsic dagoen lurra naiz,

zuc arguitcen ez nazun bitartian. Betor zure graciya, hotazazu nere gañera Ceruco intza, indazu devocioco graciya, frutu ona, ta danic onena emateco. Jasozazu pecatuen cargarequin macurtua dágoen neré biotza, ta nere deseo guztiya Ceruco gaucetara izan bedi; ango zori onaren atseguintasuna gustaturic, munduco gaucetan pensatceco, gogoa galdezadan. Tira nazazu zugana, ta quendu nazazu iraungo ez duen criaturen consuelo guztitic, cergatic eciñ munduco gaucetatic batec ere, nere deseoa osotoro sosegatu ta consolatu dezaque. Eguin nazazu zurequin bat ecin aparta litequien amorioaren lazoarequin; cergatic zu bacarric cera nai arimbat ta bear dan guztiya amatcen zaituztenentzat, ta zu gabe ecer valio ez dute gañeraco guztiyac.

## 24 CAPITULOA.

### *Besteren vicitzaric esaminatu bear ez degula.*

1. Cristau maitea, ez dezazula curiosoa izan nai, ta etzaitecela alferricaco cuidadoetan empleatu. ¿Cer importa dizu zuri gauza onec edo besteac? Zuc niri jarraizadazu. ¿Cer importa dizu zuri, ura onelacoa, edo alacoa dan, edo onela, edo ala eguiten duen, edo itz eguiten duen? Ez dezu zuc bestiacgatic erantzun bearric, ezbada cere buruagatic contua emango dezu. ¿Cergatic sartcen cera bada besteren contuetan? Nic guztiyac esagutcen ditut, ta eguzquiaren azpiyan eguiten diran gauza guztiyac icusten ditut, ta badaquizquit; nola bacoitzarequin igarotcen dan, cer pensatcen duen, cer nai duen,

ta cer intencio duen bere obretan. Nere contura utci bear dira bada gauza guztiyac; ta zu paque onean conserva zaitez, ta utcizayozu ecin gueldiric egon danari, nai duen arimbat ibiltcen; esaten, ta eguiten duen guztiya aren gañera etorrico da, cergatic ecin ni engañña nazaque. Ez dezazula casoric eguin fama andiyaz, ascoren adisquidetasunaz, ta personen baten amorioaz. Onelaco gauzac distracioac, ta animaco illuntasun andiyac sortcen dituzte. Pocic itz eguingo nizuque, ta nere gauza ezcutuac aguertuco nizquitzuque, nere etorrerari contu eguingo baldin becenioque, ta biotceco atea iriquico baldin bacenidaque. Izan zaitez contuzcoa, oracioan bela eguizu, ta humilla zaitez gauza guztiyetan.

## 25 CAPITULOA.

### *Certan daguen biotceco paque lucia, ta eguiyazco aurreratcea.*

*J.* Cristau maitea; nic esan nuen: *Paquea utcitcen dizutet, nere paquea ematen dizutet, ez munduac ematen duen bezala, ez dizutet nic ematen.* Guztiyac deseatcen dute paquea, baña eguiyazco paqueraco bear danaz ez dute guztiyac caso eguiten. Nere paquea humillaquin, ta biotz mantsocoaquin. Zure paquea paciencia andiyan izango da. Entzuten baldin banazu, ta nere deya seguitcen badezu, paque andiyaz goza deza quezu. *C.* ¿Cer eguingo det bada, Jauna? *J.* Beguirazayozu gauza guztiyetan zure burubari; cer eguiten, ta esaten dezun, ta zure intencio guztiya izan bedi niri gusto ematia, ta ez dezazula nitzaz campora ecer

ere deseatu, ta billatu. Ez dezazula ere bestien esanaz, edo eguiñaz gaizqui juzgatu, etzaitecela ere sartu zure cargura ez dauden gaucetan, ta orrela balitzaque guchi, edo guchitan zure paquea galduco dezula. Baña soseguaren faltaren bat iñoiz ez sentitcia, ta biotceco, edo gorputceco nequeren bat iñoiz ez padecitcia, vicitza onetaco gauza ez da, ezbada Cerucoa, an bacarric logratuco dana. Ez dezazula bada pensatu, eguiyazco paquean zaudela, cergatic ez dezun penaric batere sentitcen, ezta ere ondo dagoela guztiya, batere etsairic ez dezunian, ezta ere perfectoa dala guztiya, gauza guztiyac zure gustora eguiten badira, ezta ere cerbait bacerala, edo besterie baño gueyago, Jaungoicoagandic amatua, devocio, ta atseguintasun andiya izaten badezu; cergatic,

ezda virtutiaren eguiyazco amantia gauza abetan ezagutcen, ta ezdago ere onetan personaren aurreratcea, ta perfeccioa. *C.* ¿Certan bada Jauna? *J.* Jaungoicoaren vorondatera cerori biotz guztitic ofrecitcean; zure gauzaric billatcen ez dezula ez chiquiyan, ez andiyan, ez demboran, ez eternidadean; alaco moduan, ce arpegui berdiñarequin Jaungoicoari esquerrac ematen iraun dezazula zure alde, ta contraco gauzac dituzunian, guztiya berdiñ estimatcen dezula. Aiñ sendoa, ta biotz andicoa baldin bacera esperanzan, ce barrengo consuelo gabe guelditula ere, oraindic gauza andiyagoac sufritceco zure biotza prest dagoela, ta bear dan baño gueyago padecitcen dezula, pensatcen ez dezula, ezbada nic dispontcen dituran gauza guztiyetan justua, ta santua naizala

pensatcen, ta esaten dezula, orduan paquearen eguiyazco, ta chusseneco videan zabiltza, ta esperanza segurua izango dezu, berriz nere arpeguia contentuan icusteco. Zure burubaren bear dan despreciora allegatcen bacera, jaquinzazu, orduan paque ugariya gozatuco dezula, mundu onetan goza ditequien arimbat.

## 26 CAPITULOA.

*Eguiyazco libertadea duen animaren anditasuna, ceña iracurtciarequin baño, oracio humillarequin gueyago alcantzatcen da.*

C. Jauna, guizon perfectoaren obra da au, Ceruco gauren deseoan iñoiz ez lasaitcia, ta cuidado ascoren artian, alde aldean cuidado gabe igarotcia, ez nagui- Oracio ederra.

yaren, edo ardura gabecoaren guisa, ezbada anima librearen privilegioz, iñongo ere criaturari bear ez dan aficioz, aficionatu gabe. Erregutcen dizut, Jaungoico guztiz urricaltsua, guardanazazula arren mundu onetaco cuidadoetatic, gueyago enredatu ez nadin, gorputzaren premiya ascotatic, gustoac preso eguin ez nazan, animaren embarazo guztiyetatic, oriequin necaturic, erori ez nadin. *Ez* det esan nai, mundutarrac biotz guztitic billatcen dituzten gaucetatic, ezbada Adanen semeac gueralaco, guztiyenac diran miseriyetatic, ceñac asco penatcen dute, ta atceratcen dute nere anima, espirituco libertadera, gusto duen guztiyari allegatcetic. O nere Jaungoicoa, esan al baño andiyagoco gozotasuna, biurzadazu samintasuna, espiritutic ez datorren con-

suelo guztiya, zure betico amoriotic apartatcen nabena, ta mundu onetaco gauza atseguiñen baten amorioarequin bereganontz tiratcen nabena. Ez nazala ventzutu, nere Jaungoicoa, eznazala ventzutu araguiyac, eznazala engañatu munduac, ta aren gloriya laburrac, ez nazala deabruac, ta aren maliciac. Indazu contra eguiteco indarra, sufritceco pacienciya, ta irauteco sendotasuna. Indazu munduco consuelo guztiyen ordez zure espirituco gozotasuna, ta mundu onetaco gaucen amorioaren ordez, zure icen santuaren amorioa. Jana, erana, erropa, ta gorputzac bear dituen beste gauza guztiyac, penagarriyac dira espirituan sutua dagoen personarentzat. Indazu onelaco gauzaz bear dan arimbat bacarric, ta bear dan moduan usatceco graciya, ta deseo gueyegui-

requin lotu, ta nastua ez izateco ere bai. Guztiyac gugandic botatcia ezda libre, cergatic, conservatu bear degu gure viciya Jaungoicoac nai duen ártian, baña faltaric eguiten ez dútenac, ta gusto gueyago ematen dutenac billatcia, legue santuac eragozten du, cergatic bestela araguiya espirituaren contra alchatuco litzaque. Erregutcen det azquenic, zure escubac governa nazala, ta eracutsi dizadala, cerbait gueyegui eguiñ ez dedin.

## 27 CAPITULOA.

*Jaungoicoaz campoco beste eroceñ gauzaren amorioac asco atceratcen duela on guztiyen onetic.*

1. Cristau maitea, preciso da guztiya, guztiyagatic zuc ematia, ta zurea batere ez izatia. Jaquinzazu, zure burubaren amorioac calte gueyago eguiten dizula, munduco

beste eroceñ gauzac baño. Diozun amorioa nola dan, ala ere ichassten zayo, eroceñ gauza biotzari, guchi, edo gueyago. Zurè amorioa garbiya, tolesgabea, ta bear dan moduan disponitua baldin bada, etcera gaucen esclavo izango. Iruquitcia libre ez dana, deseatu ez dezazula; ez dezazula amatu eragotcizaitzuna, ta animaco libertade gabe utci zaitzacana. Arritcecoa da, etcerala deseatu al, edo izan aldizaquezun gauza guztiyaquin biotz guztitic nere escubetan paratcen! ¿Cergatic arrazoi gabeco tristurarequin acabatcen cera? ¿Cergatic alferricaco cuidadoaquin necatcen cera? Egon zaitez nere vorondatera, ta ez dezu batere calteric padecituco. Au, edo bestea nai izaten badezu, edo emen edo an egon zure conveniencia gatic, ta zure gustoa gueyago cumplitciagatic, etcera

iñoiz ere paquean vicico, ta cuidadoric gabe, cergatic gauza guztiyetan faltaren bat topatuco dezu, ta lecu guztiyetan norc contra eguin ere bai. Ez du bada laguntcen, edo aprovechatcen gauzaren bat logratciac, edo campotic gueitciac, ezbada gauzac despreciatciac, ta ayen aficioa quentciac. Eta ez dezu au ondasunacgatic bacarric aditu bear, ezbada baita ere honren, ta munduco alabantcen dedeseoagatic, ceñac guztiyac mundu arequin batian igarotcen dira. Guchi valio du lecubac, falta baldin bada espirituco suba, ez du ere campotic billatu dan paque arc luzaro iraungo, ez baldin bacera nigan egoten. Truca zaitezque, baña ez obetu, cergatic ocasioa sórtcen danian, ta aguertcen danian, igues eguin cenuena; ta gueyago topatuco dezu.

*Biotceco garbitasuna, ta Ceruco jaquinduriya alcantzatceco.*

ORACIOA.

Sendo nazazu, Jauna, Espiritu Santuaren graciyarequin. Indazu graciya espirituan indartceco, ta ecer servitcen ez duten cuidado ta ansiya guztiyetatic nere biotza apartatceco, munduco gauza baten ere deseoz eramana ez izateco, ezbada guztiyai acabatcen diranai bezala beguiratceco, ta nerau ere ayen guisa acabatuco naizala, cergatic ezda gauza iraucorric eguzquiyaren azpian, ceñian guztiya vanidadea, ta pena da. ¡O ceñ jaquintsua dan onela pensatcen duena! Indazu, Jauna, Ceruco jaquinduriya, icasi dezadan zu gauza guztiyen gañian billatcen, ta topatcen, guztiyai baño gusto gue-

yago artcen, ta amatcen, ta bestiac zure jaquinduriyac disponitu dituen bezala entenditceco. Indazu graciya palacatcen diran gauzatic prudenciarequin apartatceco, ta contra eguiten diratenai pacienciarequin sufritceco; cergatic jaquinduriya andiya da au, eroceñ itzgatic ez muguitcia, ta gauza gaiztoraco palacatcen duenari belarriyac ichitcia; cergatic onela, asi dan videa cuidado gabe eguitia da.

## 28 CAPITULOA.

### *Murmuratzallien contraco consejua.*

7. Cristau maitea, etzaitecela enfadatu norbaitec zugatic gaizqui juzgatuagatic, ta gustatcen etzaitzuna esanagatic. Zuc gaiztoagoac zugatic pensatu bear dituzu, ta zu baño ecer ezagoric, iñor ez dala.

Zure animaren onean guztiya empleatua baldin bazabiltz, ez dezu caso asco eguingo aiciàc daramazquien itzaz. Ez da prudenciya chiquiya, dembora gaiztoan issillic egotia, nigana barreneronz biurtcia, ta guizonen esanacgatic animaco sosegua ez galtcia. Ez dedilla zure paquea guizonen aboan izan, cergatic ondo, edo gaizqui zugatic esan dezatela, etcera orregatic besteric izango. ¿Non dago eguiyazco paquea, ta gloriya? ¿Ez dago venturaz nigan? Eta deseatcen ez duenac personai agradatcia, ta bildurric ez duenac ayei ez gustatceco, paque andiya gozatuco du. Arrazoi gabeco amoriotic, ta bildurretic sortcen da soseguaren falta, ta sentiduen distracio guztiya.

## 29 CAPITULOA.

### *Nola gure naigabe, ta pena guztiyetan Jaungoicoa deitu, ta alabatu bear degun.*

℣. Bedeicatua izan dedilla, Jauna, zure icen santua, cergatic, tentacio, ta neque au nere gañera etortcia nai izan dezun. Eciñ onengandic igues eguin det, baña zugana igues eguiteco premiya det, lagun dirazazun, ta onian biur dirazazun. Penatua nago, Jauna, ta ezdago nere anima ondo, ezbada asco penatcen nau oraingo pasioac. ¿Eta cer esango det orain, aita maitea? Penen artian preso nago, libranazazu ordu onetatic. Baña ordu onetara etorri naiz ni, guztiz humillatua, ta zugandic libratua izaten naizala, zu honratua izan zaitecen. Gusta beguizu, Jauna, ni libratcia, cergatic nic, po-

bre onec, ¿cer eguin dezaquet, ta nora joan ninteque zu gabe? Indazu, Jauna, paciencia ocasio onetan ere. Lagunzadazu, nere Jaungoicoa, ta ez naiz bildurtuco, dan gueyena necatua izanagatic ere. Baña bitartian ¿cer esango det? Jauna, zure vorondatia cumplibedi. Nic ondo merecitu izan det penatua, ta necatua izatia. Preciso da bada sufritcia, ta ojala alere pacienciarequin, demboral gaizto au igaro, ta obeto izan dedin artian. Baña poderosoa da Jauna, guztiya aldezaquen zure escuba, tentacio au ere nigandic quentceco, ta aren indarrac guchitceco, guztiro erori ez nadin, ascotan lenago nerequin eguin izan dezun bezala; bai, nere Jaungoicoa, ta nere misericordia cerana. Eta cembat eta neretzat gaitzagoa, ambat eta zuretzat errazagoa da gauz au.

## 30 CAPITULOA.

### *Jaungoicoaren graciya escatcearen, ta berriz errecibitceco confianzaren gañian.*

1. Cristau maitea; tentacioco demboran indarra ematen duena ni naiz. Ondo ez dijoaquizunian, nigana atoz. Ceruco consueloa chit asco eragozten duen gauza, zu berandu oracioratcia da. Bada niri zure nequeagatic escatu baño lenago, asco consuelo bitartian billatcen dituzu, ta campoco gaucetan divertitcen cera. Orregatic guertatcen da guchi guztiyac valio izatia, oartu zaitecen artian, ni naizala, nigan esperatcen dutenac libratcen dituraña, ta ez dala nitzaz campora valio duen laguntceric, ta consejuric, ezta iraun dezaquien erremedioric. Baña berriz arturic espiritua tentacioaren on-

doren, artutcitzu indarrac nere misericordiaren arguiyan, cergatic aldean nágo, guztiyac lenago bezala ipintceco, ez bacarric osotoro, ezbada baita ere ugari, ta gañez eguiterañó. ¿Bada venturaz neretzat gauza gaitcic? ¿Edo izango naiz esau bai, ta eguin ez, eguiten duenaren guisacoa? ¿Non da zure sinismena? Firme zaudé, ta iraunzazu. Íchoron zadazu, ichoron; etorrico naiz, ta erremediatuco zaitut. Tentacioa da zu necatcen zaituena, ta motivo gabeco bildurra, icaratcen zaituena. ¿Certaco valio du guero guerta ditezquien gaucen cuidadoac, ezbada zu tristatceco? *Egunac bere gaitza asco du.* Zoraqueriya, ta ecer servitcen ez duen gauza da, guèrta ditezquien gauzacgatic penatcia, edo alegratcia, cergatic balitzaque iñoiz guertatuco ez dirala. Baña

guizonarena da onelaco imaginacioaquin egañatua izatia, ta oraindic animo chiquiyaren señalea, etsayaren tentaciora añ erraz eramana izatia; cergatic arc ez du beguiratcen, eguiyazco gauzaquin, edo guezurrezcoaquin engañatcen duen; presenteco gaucen amorioarequin, edo guerocoen bildurrarequin lurreratcen duen. Ez dezala zure biotzac bere paquea galdu, ta ez dezala bildurric izan. Sinis-zazu nigan, ta nere misericordian confiazazu. Nigandic urruti zaudela, uste dezunian zuc, orduan nago ni ascotan alderago. Zuc uste dezunian, alde aldean guztiya galdua dagoela, orduan dago aldean ascotan merecitceco erabaciya. Ez dago guztiya galdua, contrara gauza guertatcen danian. Ez dezu presentian sentitcen dezun bezala juzgatu bear, ta ez dezu

guertatcen zaizquitzun trabajuac-gatic aimbeste animoa galdu bear, ce ez daucazula ya esperanzaric, neque artatic iñoiz libratuco cerala.

Ez dezazula pensatu guztiro desamparatua zaudela nequeren bat noiciau beñ bialtcen badizut ere; edo deseatcen cenuen consueloa gabe utcitcen bazaitut ere; orrela joaten da Ceruco Erreinora. Motivo onengatic, conveniyago zaitzu zuri, ta nere beste adisquideai, nequeaquin egercitatua izatia, gauza guztiyac zure gustora guertatcia baño. Nic ezagutcen ditut pensamentu ezcutuac, cergatic asco conveni da zure salvacioraco, consuelo gabe noician beñ utciya izatia; arrotu etzaitecen venturaz irteera onian, ta zure burubari ez dan gauzan agradatu nai izan ez diozazum. Quendu dezaquet eman nuena, ta gusto deraniaq

atcera eman dezaquet. Ematen deranian nerea da, ta quentcen deranian, ez det zurea quenduco, cergatic nerea da doai on, ta perfecto guztiya. Bialtcen baldin badizut trabajuren bat, etzaitecela zure artian enfadatu, ta ez dezazula ere animoa galdu nai, cergatic, laster jaso dezaquet nic, ta pena guztiya consuelora biurtu dezaquet. Bada justua, ta asco alabatcecoa naiz, orrela zurequin eguiten deranian. Pensatcen baldin badezu ondo, ta bear bezala consideratcen badezu, ez dezu iñoiz trabajuagatic animoa aimbeste galtceraño penatu bear, ezbada gueyago alegratu, ta Jaungoicoari esquerrac eman bear diozcatzu. Ta oraindic gueyago dana, au bacarric iruqui bear dezu consuelotzat, ce ez dizurala barcatcen, dolorequin penatuaz. Aitac amatu nin-

duen bezala, nic ere zuec amatcen zaituztet, esan nien nere discipulo maiteai, céñac ez nituen eguiyaz munduco consuelotara bialdu, ezbada pena andiyetara, ez honretara, baicican desprecioetara, ez alferqueriyara, ezbada nequeetara, ez descantsura, baicican frutu asco paciencian ematera. Acorda zaitez, cristau maitea, itz abetzaz.

## 31 CAPITULOA.

*Nola Creadorea topatceco criatura guztiyac despreciatu bear diran.*

*C.* Jauna, ondo premiya det oraindic graciya andiyagoren, allegatuco baldin banaiz iñongo criaturac ecin eragotci nazaquien estadura. Cergatic gauzaren batec naucan bitartian, libertadearequin zugana egatu ecin det. Libertadearequin egatcia deseatcen zue-

nac esaten zuen: ¿Norç emangò disquit niri usuaren antceco egac, ta egaturo det, ta descantsatuco det. Cer tolesgabeco beguiyac baño sosegatuagoric? ¿Ta ceñ munduan ecer deseatcen ez duena baño libreagoric? Preciso da creatura guztiyen gañetic igarotcia, ta bere buruba perfeccioarequin utcitcia, ta consideratcia, ez duela guztiyen Creadoreac criaturen antceco gauzaric. Eta ez baldin bada persona criatura guztiyetatic libratcen, ezda Jaungoicoaren gaucetan libertade guztiyarequin empleatuco. Orregatic bada contemplativo, edo Jaungoicoaren gauzac arguiro consideratcen egoten diranac, guchi topatcen dira, cergatic guchic daquite acabatu bear duten gauza abetatic, ta criaturetatic osotoro apartatcen. Onetaraco graciya andiya bear da, anima jaso dezan,

ta bere gañ eraman dezan. Eta ez baldin badago persona espirituan jasoa, ta criatura guztiyen amoriotic erantciya, ta Jaungoicoarequin guztiya bat eguiña, guchi valio du daquien, ta duen guztiyac. Luzaro chiquiya egongo da, ta erorico da berà, Jaungoicoaz campora beste gauzaren bat anditzat daucana. Jaungoicoa ez dan guztiya ecer ez da, ta ecer etzat iruqui bear da. Eta diferencia andiya dago Ceruco arguiyaz arguitutaco, ta persona devotoaren jaquinduriyan, tá Sacerdote estudiosoaren jaquinduriyan. Ascoz nobleagoa da Jaungoicoagandic Cerutic datorren jaquinduriya, edo doctrina, nequearequin mundu onetan estudioz logratcen dana baño. Asco topatcen dira contemplacioa deseatcen dutenac, baña artaraco bear dana eguitia, procu-

ratcen ez dute. Orretaraco asco eragozten duen gauza eguiten da, bada sentiduen gustoco gaucetan empleatcen da, ta bear bezala mortificatciaz caso guchi eguiten da.

Ez daquit nic cer dan, cer espirituz governatcen gueran, ta cer billatcen degun espiritualen icena degunac, bada neque añ andiya, ta oraindic gueyagoco cuidadoa artcen degu mundu onetaco gauzacgatic, ta gure animaco gaucetan doy doya beñ bacarric ere gure sentiduac osotoro mortificatcia pensatcen degu. ¡O penatceco gauza! Gugana pisca bat bildu orduco, bereala campoco gaucetara zabaltcen guera; ta ez ditugu ere gure obrac zorrotz esaminatcen. Ez degu ondo beguiratcen cer gaucetan dauden gure deseoac, ta ez degu negar eguiten, ceñ ciquiñac dieran gure obra guztiyac. Nola bada

gure barrengo afecto, edo deseoa asco ciquindu dan; preciso da, argandic datorren obra ere, ceña dan barrengo virtutiaren señalea, ciquindua izatia. Biotz-garbitic sortcen da vicitza onaren frutua. Galdetcen da, cembat eguin duen personàc, baña ez cembateco virtutearequin eguin duen; ez da au aimbeste cuidadorequin pensatcen. Indarsua ote dan, aberatsa, ederra, habilla dan, escribiente ona, cantari ona, ta bearguille ona dan beguiratcen da, baña espirituz ceñ pobrea dan, ceñ sufritua, ta mansoa, ceñ devotoa, ta persona espirituala dan, caso guchi eguiten dute ascoc. Naturalezac, edo gure izateac personaren animaz campoco gauzai beguiratcen die, baña graciyac barrengoai, maiz engañatcen da ura, onec Jaungoicoagan esperatcen du, engañatua izan ez dedin,

## 32 CAPITULOA.

### *Bere buruba uçatciaren, ta mundu onetaco gauza guztiyen deseoa utciciaren gañian.*

J. Cristau maitea, ez dezu libertade perfectoric izango, guztiro ucatcen ez baldin bacera. Grilluaquin daude beren buruben amante guztiyac. Guticiosoac, ecer servitcen ez duten gaucen deseoan empleatcen diranac, naguiyac, edo alferrac, ibillinayac, beti gauza atseguiñen billa dabiltzanac, ta ez Jesusenac diranaç, ezbada ascotan ecin iraungo duten gauzac pensatcen ibiltcen diranac, cergàtic ezda Jaungoicoaz campora gauza iraucorric, edo argandic ez datorrenaz campora. Gordezazu zure biotcian itz edo sermoi labur, baña perfeccio andico au: Uçtcitzatzu guztiyac, ta topatuco dituzu gu-

tiyae; uicizazu mundu onetacó gaucen deseoa, ta topatuco dezu descantsua.. Au zure bacarrian, maiz considerazazu, ta cumplitcen dezunian, guztiya entendituco dezu. *C.* Jauna, ezda au egun bateco eguiteçoa, ta guchiyago aurren jostaqueta, ezbada añ andiya, ce onetan sartcen da Erligiosoen perfeccio guztiya. *J.* Cristau maitea, ez dezu virtutian perfectoac diranen videa entzun, ta bereala atceratu bear, ta animoa galduric guelditu bear, ez bada gueyago muguitu bear cera gauza andiyetara, edo beñepen aben deseoz egon bear dezu. Ojala zurequin orrela balitz, ta zure burubaren amantia ez izatera allegatu izan baciñaqué, ta nere, ta eman dizuran aita espiritualanen voron datera egongo baciñaque, gusto andiya emango cenidaque orduan.

ta zure vicitza guztiya consuelo, ta paquean igaroco cenuque. Oraindic asco cer utci dezu, ceña ez badezu guztiro nere vorondatera utciteen, ez dezu escatcen dezuna logratuco. Consejatcen dizut, erosi dizadazula urre sutua, aberastu zaitecen, au da Ceruco jaquinduriya, munduco gauza guztiyac ompean erabilteen dituena. Despreciazazu munduco jaquinduriya, ta zure burubaz gusto artcia. Esan det, gueyago estimatu bear dituzula mundu onetaco gauza despreciatuac, estimatuac baño. Cergatic, chit despreciatua, chiquiya, ta alde aldean guztiro aztua icusten da Ceruco jaquinduriya; bere burubaz ez andiro pensatcia, ta munduan alabatua ez izatia deseatcia, ceña ascoc aboaz bacarric alabatcen dute, obrac contracoac dira; baña bera da orregatic ere

ñeño andico perla guchiyagandic ezagutua.

## 33 CAPITULOA.

*Ceñ aldacorra dan gure biotza, ta gure intencioa gauza guztiyetan Jaungoicoagana chussendu bear degula.*

1. Cristau. maitea, ez diozazula sinistu zure deseoari, ceña instante onetan bada, ta andic puntuco, beste gaucetan aldatuco da. Nai ezta ere aldacorra izango cera vici ceran artian; oraiñ alegre, ta bereala triste, oraiñ soseguan, ta bereala turbatua, orain devoto, ta bereala devocio gabe, beñ Jaungoicoa serviteeco su andiyarequin, ta guero epel, beñ necatua, ta guero neque guchi sentitcen dezula. Gauza aldacor aben guztiyen gañ sendo egoten da espirituan jaquintsua, ta ondo eracutsiya da-

na; beregan cer sentitcen duen erreparatcen ez duela, edo ceñ aldetatic jotcen duen aldatcearen aiceac, ezbada aren atencio guztiya bear dan, ta deseatua dan fiñera dijoala. Orrela conserva zaitezque beti bat, ta sosegu, batere mudatcen etcerala, zure atencioa beti nigan daucazula. Eta cembat eta garbiyagoa dan intencioa, ambat eta sendoago conservatcen da, mundu onetaco gaucetan aldatu gabe persona; baña ezda asco personetan bear litzaquien becen garbiya intencioa conservatcen, cergatic laster beguiratcen diote gogoratcen zayen, edo topatcen duten gustoco gauzaren bati, eta guchitan topatcen da bere provechua billatcetic guztiro libre dagoenic; ala joan ciran Juduac beste dembora batian Betaniara, ez Jesusgatic bacarric, ezbada baita

erè Lazaro icusteagatic. Garbitu bear da bada intencioa, ta niganaco videac diran gaucetan gueldituu gabe, nigana etorri bearda.

## 34 CAPITULOA.

***Amatcen duenari, gauza guztiyac baño gueyago, ta gauza guztiyetan gustatcen zayola Jaungoicoa.***

*C.* Orra, nere Jaungoicoa, ta gauza guztiyac. ¿Cer gueyago nai det, ta cer gauza obeagoric deseadezaquet? ¡O itz gozoa, ta atseguiña! Baña Jesus amatcen duenarentzat, ez mundua, ta an diran gauzac. Nere Jaungoicoa, ta gauza guztiyac. Asco esan da entenditcen duenarentzat, ta berriz; ta berriz esatea gauza atseguiña da amatcen duenarentzat. Zu izan ezquero bada, Jauna, gustocoa

dira gauza guztiyac, baña zu faltatu ezquero, enfadagarriyac dira. Zuc eguiten dezu biotz sosegatua, paque andiya, ta alegriya zoragarriya. Zuc eguiten dezu gauza guztiyaz bear dan bezala pensatcia, ta guztiyetan zu alabatcia, ta zu gabe ecin luzaro gauzac gusto eman dezaque; orretaraco izan beardu an zure graciyac, ta zure jaquinduriyaren uquenduarequin untatua izan beardu. Zu gustatcen etzaitzacanari; ¿cer ondo gustatu al litzayoque? Baña galtcen dira zure jaquinduriyan munduco jaquintsuac, ta araguiyaz gustatcen diranac, cergatic batian, au da munduco jaquinduriyan, vanidade andiya, ta bestean, au da araguiyan, eriotza topatcen da. Baña munduaren desprecioa, ta gorputzaren mortificacioa mediante zuri jarraitcen dizutenac, eguiyaz ja-

quintsuac dira, cergatic vanidadetic eguiyara, ta araguitic espiritura igarotcen dira. Abei gustatecen zaye Jaungoicoa, ta criaturetan topatcen dan on guztiya beren Eguillearen alabanzara chussentcen dute. Diferentia, ta guztiz diferentia alaere da Creadorearen gustoa, ta criaturena, eternidadearena, ta demborarena, betico arguiyarena, ta demboraz sortuarena. O betico arguiya, demboraz izan diran argui guztiyac igarotcen dituzuna, bialdu zadazu nere anima guztiya arguituco duen arguiya; garbi zazu, alegrazazu, arguizazu, ta vicituzazu nere espiritua, bere potenciaquin, afecto zoragarriyaquin zuri ichasteco. O ¿noiz etorrico ote da ordu zori oneco, ta deseagarri au, zure presenciarequin ase nazazun, ta gauza guztiyac cerori neretzat izan zaitecen? Au

ematen etzaitadan bitartian, ez da izango neretzat consuelo beteric. ¡O gauza penagarriya! Vici da oraindic nigan nere araguiya, ez dago guztiro crucificatua, ezta ere bear bezala illa; oraindic gogotic espirituaren contra leyatcen da, guerra gogorra eguiten dio, ta ez dio animari paquean utcitcen: baña zu, itzasoari aguintcen diozuna, ta aren bagac mantsotcen dituzuna, jaiqui zaitez, ta lagundu zadazu. Acabatcitzu nere barrenen guerra nai dutenac, puscatcitzu zure virtutiarequin. Aguertcitzu arren zure misericordiac, honratua, ta glorificatua izan zaitecen; ecergatic ezda neretzat esperanza, ta laguntceric, ezbada zugan, nere Jaun, eta Jaungoicoa.

# 35 CAPITULOA.

## *Ez dagoela vici gueran artian tentacioaz seguridaderic.*

J. Cristau maitea, vici ceran artian etzaude iñoiz seguru, ezbada beti arma espiritualen premiya dozu. Etsayen artian vici cera, ta nola escoyetic, ala esquerretic beti pelea dezu. Ez baldin bacera bada pacienciaz valiatcen, etcera luzaro zauri gabe egongo. Orretzaz gañera, ez baldin badezu zure biotza nigan sendo ipintcen, nigatic padecitceco vorondate osoarequin, ecin sufri dezaquezu guerra au, eztá ere zori onecoen palmara, edo gloriyara allegatu. Preciso da animo, audiyarequin guztiyac igarotcia, ta escu indarsuarequin ayen contra pelcatcia, cergatic ventzutcen duenari ematen zayo zori on audiya, ta nagujtcen danarentzat

miseriya baicic gueldicen ezda. Descantsua mundu onetan billatcen badezu, ¿nola guero betico descantsura allegatuco cera? Etzaiecelá mundu onetan paque ascoraco, edo descantsu ascoraco prestatu, ezbada paciencia anditaco. Eguiyazco paquea Ceruan, tá ez munduan billazazu, ez personetan, ta gañeraco criaturetan, ezbada Jaungoicoan bacarric, Jaungoicoaren amorez guztiya gustora sufritu bear dezu, nequeac, eta doloreac, tentacioac, eta persecucioac, estutasunac, ta premiyac, gaitzac, eta agrabioac, murmuracioac, eta errepreusioac, humillacioac, eta lotsac, castiguac, eta desprecioac. Abec laguntcen dute virtuteraco, abec probatcen dute Jaungoicoaren servicioan asi berriya, abec eguiten dute Cerucó coroa. Betico zariya emango det

nic neque laburragatic, azquen gabeco honra, igarotcen dan lotsagatic. Pensatcen dezu venturaz, gusto dezun guztiyan izango dituzula jaungoicozco consueloac? Etcituzten ala izan nere Santuac, ezbada neque andiyac, asco modutaco tentacioac, ta animaco legortasun andiyac; baña pacienciarequin egon ciran guztiyetan, ta berengan baño gueyago Jaungoicoagan confiatu zuten, mundu onetaco penac, Cerua merecitceco diña ez dirala, jaquiñic. ¿Bereala izan nai dezu zuc, ascoc pena, ta negar ascorequin doy doya logratu zutena? Ichoron zayozu Jaungoicoari, sendo, ta animo andiyarequin zaudé, ez dezazula confianza galdu, ez dezazula igues eguin, ezbada ipiñizazu animo andiyarequin gorputza, ta anima Jaungoicoaren honragatic. Pagatuco dizut guztiz

osotoro, zurequin izango naiz ni zure estutasun guztiyetan.

## 36 CAPITULOA.

### *Ez dala casoric eguin bear personen juzguacgatic.*

J. Cristau maitea, botazazu zure biotza sendo Jaungoicoagan, ta ez dezazula personen juzguaz bildurric izan concienciac ecertan errependitcen etzaituenian. Gauza ona, ta zori onecoa da orrela padecitcia, ta ez da au ecin eramañequico gauza izango biotz humillarentzat, ta bere buruban baño, Jaungoicoagan gueyago confiatcen duenarentzat. Ascoc asco gauza esaten dituzte, ta orregatic guchi sinistu bear zaye; ta gustiyai gusto ematea ere, ecin ditequien gauza da. San Pabloc guztiyai Jaungoicoagan gusto ematia procuratu

izan bazuen ere, ta guztiya guztiyentzat eguin bazan ere, orregatic ere etzuen ecertan iruqui, munduagandic juzgatua izatia. Eguin al guztiya eguin zuen bestien egemplo, ta salvacioagatic; baña orregatic ere juzgatua, ta despreciatua ez izatia, etzuen logratu. Orregatic utci zuen guztiya, guztiya ezagutcen duen Jaungoicoaren escubetan, ta pacienciarequin defenditu zan beragatic gaizqui esaten, pensatcen, ta nai zuten guztiya asmatcen zutenen contra. Frantzun zuen orregatic ere batzuetan, virtutean argalen batzuec, edo inocenteren batzuec aren issillic egonetic pensatu etcezaten, eguiyac cirala argatic esaten ciranac, ta ala escandalizatu etciteecen. ¿Nor cera zu guizon ilcorragatic bildur izateco? Gaur bada, ta ezda bigar icusten. Jaun-

goicoari bildur izan zayozu, ta personen izuaz etcera bildurtuco. ¿Cer dezaque bestec zugan itzaquin, edo gaizqui esanaquin? Zuri baño, calte gueyago eguiten dio bere burubari; eta nor nai izan dedilla, ez du Jaungoicoaren juiciotic igues eguingo. Iruquizazu zuc Jaungoicoa vistan, ta etzaitecela quejatcen asi. Iruritcen baldin bazaitzu galtcen dezula estimacioa oraingo, ta mereci ez dezun lotsa padecitcen dezula, etzaitecela orregatic enfadatu, ta ez dezazula ere zure pacienciaren faltaz zure coroa galdu, edo guchitu, ezbada beguirazazu nigana Cerura, cergatic poderosoa naiz lotsa, ta vide gabequeriya guztitic libratceco, ta bacoitzari, aren obrai dagoquien bezala pagatceco.

## 37 CAPITULOA.

*Biotceco libertadea, edo animacoa logratceco bere buruba guztiro utzitcearen gañian.*

J. Utci zaitez, cristau maitea, ta topatuco nazu. Egon zaitez auqueraric, ta zure vorondateric batere gabe, ta beti erabacico dezu, cergatic utcitcen ceran beceñ laster, ta berriz artcen etceranian, graciya gueyago emango zaitzu. C. ¿Cembat bider, ta cer gaucetan utcico naiz, Jauna? J. Beti, ta gauza guztiyetan, nola chiquiyan, ala andiyan, ez det batere beresten, ezbada guztiyan gauza guztiyetatic erantciya egotia nai det. ¿Nola izan zaitezque bestela nerea, ta ni zurea, ez baldin bacera gauza guztiyetan zure vorondadetic barrendic, ta campotic erazten? Cembat eta lasterrago, au eguiten dezun, ambat eta obeto

egongo cera: ta cembat eta osotoroago, ta biotz garbiagoarequin, ambat eta gusto gueyago emango dirazu niri, ta erabaci ere gueyago eguingo dezu. Utcitcen dira batzuec, baña beressteren batequin, eergatic ez dute osotoro Jaungoicoagan confiatcen, orregatic procuratcen dute beren buruacgatic beguiratcia. Ascoc berriz, lembici guztiya escaintcen dute, baña guero, tentatuac diranian, berenetara biurtcen dira, orregatic virtutean chit guchi aurrecatcen dute. Ez dira onelacoac allegatuco biotz garbiyaren eguiyazco libertadera, ta nerequico tratatce atseguiñera, guztiya utci, ta egunero beren buruba ucatcia eguin artian, ceña gabe eçin nerequin bat eguin diteque.

Chit ascotan esan dizut, ta orañ ere esaten dizut. Utci zaitez, utci zaitez nere escuban, ta animaço

paque andiya gozatuco dezu. Emazu guztiya guztiyagatic, ez dezazula ematen dezunagatic ecer escatu, egon zaitez garbi, ta sendo nigan, ta izango nazu. Libre egongo cera biotcean, ta etzaitue illuntasunac ompean artuco. Onetaraco indar eguizu, au escazazu, au deseazazu, zure vorondate guztitic erantci zaitecen, ta orrela Jesusi bacarric jarrai diozazun; zuretzat il, ta neretzat beti vici zaitecen. Ez dezu orduan izango imaginacio zororic, estutasun gaiztoric, ta cuidado alferric. Joango da zugandic bear ez dan bildurra, ta ilco da bear ez dan amorioa.

## 38 CAPITULOA.

*Animaz campoco gaucetan nola governatu bear gueran, ta Jaungoicoa peligroetan billatu bear degula.*

1. Cristau maitea, cuidado andi-

yarequin procuratu bear dezu au, ceña dan, lecu, ta animaz campoco eguitero guztiyetan beti libre, ta zure burubaren jabe izatia, ta gauza guztiyac zure mendean egon ditecela, ta ez zu ayen mendean; onela izan zaitecen zure eguiteroen jabea, ta governatzallea, ta ez esclavoa, ta servitzariya, ezbada librea, ta eguiyazco Israeltarra, Jaungoicoaren semeen herenciara, ta libertadera igarotcen cerana. Jaungoicoaren semeac dira mundu onetaco gaucen gañ daudenac, ta Cerucoac consideratcen dituztenac, munducoai begui gaiztoarequin, ta Cerucoai onarequin beguiratcen dituztenac, munducoac berai ichassteco, berenganoz tiratcen ez dituztenac, ezbada contrara, berac munduco gauzac berengana tiratcen dituztenac, Jaungoicoac disponitu zuen bezala ayetzaz

usatceco, ceñac, guztiyac orden onean eguin cituen. Ocasio guztiyetan eguiyaz sendo egoten baldin bacera, ez baldin badituzu ere entzuten, edo icusten dituzunac araguizco begui ichuaquin consideratcen, ezbada eroceñ gaucetan zure bacarrera sartcen baldin bacera Moises Santua bezala, Jaungoicoarequin consultatcera, éntzungo dezu beñ baño gueyagotan beraren erantzuquiya, ta oraingó, ta gueroco gauza asco ezagutuco dituzu. Moises bada Jangoicoagana joaten zan bere duda guztiyetan, tá oracioaren erremedioa artu zuen persònac peligro, ta gaiztoqueritic libratceco; ala zúc ere zure biotceco bacarrera igues eguin bear dezu Jaungoicoaren laguntza gogotic escatcera. Au eguin faltaz, Josue, ta Israelgo semeac Gabaotarrengandic engañatuac izan ci-

rala, contatcen da Escritura Sagraduan, cergatic etcioten Jaungoicoari lembici galdetu, ta ala itz biguñai erraz sinistuta, bear etzan erruquiyarequin engañatuac izan ciran.

## 39 CAPITULOA.

### *Ez duela personàc cuidado gueyegui bere negocio edo eguitecoetan iruqui bear.*

*J.* Cristau maitea, utcizazu nere contura zure negocio edo eguitecoa, ta disponituco det bear dan bezala bere demboran. Ichonzazu nic dispontcen derana, ta provechua sentituco dezu orretatic. *C.* Jauna, gusto andiyarequin gauza guztiyac zure contura utcitcen dizquitzut, cergatic, guchi aurreratu dezaque nere pensamentuac. Ojala ez baldin banintzaque gueyegui empeñatuco guertatu

ditezquien gaucetan, ezbada, bereala zure vorondatera utcico banintzaque. *J.* Ascotan deseatcen duen gauza personàc buruban nastutcen du., baña alcantzatcen duenian, beste modutan pensatcen du, cergatic gauza arganaco beraganaco aficioa ez da iraucorra, ezbada erraz aldatcen da. Ez da bada gauza chiquiya gauzaric dan chiquiyenetan ere bere buruba uteitcia. Personaren eguiyazco aurreratcea bere buruba ucatcia da; ta bere buruba ucatua daucan persona chit libre, ta segúru dago. Baña gauza on guztiyai contra eguiten dien deabruac ez dio tentatciari utcitcen ezbada engañio asco pensatcen ditu gau, ta egun, doscuidaturen bat engañiatcia logratu ote dezaquien. *Zauidete belan, ta eguizute oracioa*, esaten du Jaungoicoac.

## 40 CAPITULOA.

*Ez duela guizonac, edo personac beréz gauz onic, ta ecin ecertzat arrotu, edo gloriyatu ditequela.*

C. *Jauna, ¿cer da guizona zu beráz acordatceco, edo guizonaren semea zuc visitatceco?* ¿Cer merecitu du guizonac, zuc berari zure graciya emateco? ¿Cer motivo izango det, Jauna, quejatceco, utcitcen banazu? ¿Edo cergatic contu artu dizaquezut escatcen dizurana ucatcen badirazu? Duda gabe au eguiyaz pensatu, ta esan dezaquet. Jauna, ecer ez naiz, ecer ecin det; ez det nigandic gauz onic, ezbada gauza guztiyetan faltatcen det, ta beti ecer ecera nua: eta zuc laguntcen ez badirazu, ta barrendic sendotcen ez banazu, guztiya epela, ta distraitua eguiten naiz. Baña zu, Jauna, beti ber

Bera cera, ta beti irauten dezu, beti ona, justua, ta santua, ondo, ta bear dan bezala gauza guztiyac eguin ta disponitcen dituzuna: baña ni aurreratcera baño, faltatcera gueyago inclinatua naizana; ez naiz beti batian irauten derana, ezbada guztiz aldacorra; baña laster ondo izaten naiz, laguntceco escuba ematen dirazunian; cergatic zuc bacarric iñoren premiya gabe aimbesterraño lagundu ta sendotu nazazuque, ce esnadilla ya gueyago bestetara aldatu, ezbada zugan nere biotza biurtu, ta descantsa dedilla. Orregatic utcico baldin banuque nic munduco consuelo guztiya, dala devocioa alcantzatciagatic, dala zu billatceco deran premiyagatic (ez da bada munduan ni consola nazaquenic) orduan arrazoyarequin zure gracia espera nezaque, ta consuelo

berriyagatic alegratu ninteque. Esquerrac, Jauna, zuri, cergatic zugandic dator guztiya níri ondo guertatcen zaidan guztiyan. Baña ni zure vistan vanidadea, ta ecer eza, ta aldacorra, ta eriya naiz. ¿Nondic bada gloriya ninteque, edo cergatic deseatcen det, besteac ni cerbaitean iruquitcia? Venturaz ecerezgatic? ta au gauza guztiz zoroa da. Vanagloriya eguiyaz peste, edo izurri gaiztoa da, ta vanidade guztiz andiya, cergatic apartatcen du eguiyazco gloriyatic, ta eraztendu Ceruco graciyatic. Bere burubari agradatcen dionian personàc, zuri desagradatu, edo nai gabea ematen dizu. Munduco alabantzac nai dituena, virtutè eguiyazco gabe guelditcen da. Eguiyazco gloriya bada, ta alegriya santua zugan gloriyatcia da, ta ez beregan; zure icenian gozatcia, ta

ez bere virtutian, ezta ere zugatic ezbada bestela, criaturaren batian gozatu. Alabatua izan bedi zure icena, ta ez nerea, alabatua izan bedi zuc eguiten dezuna, ta ez nic eguiten derana. Bedeicatua izan bedi zure icen santua, baña ez daquidala niri munduco alabautzatatic ecer egotci. Zu nere gloriya, zu nére animaco consueloa. Zugan gloriyatu, ta gozatuco naiz nere egun guztiyetan, baña nigatic batere ez, ezbada nere argaltasunetan. Billa bezate Juduac batac bestearen gloriya, baña nic Jaungoicoarena bacarric, edo argandic dana bacarric billatuco det. Cergatic munduco gloriya guztiya, munduco honra guztiya, munduco anditasun guztiya zure gloriyaren aldean, vanidadea, ta eroqueriya da. O nere eguiya, ta nere misericordia, nere Jaungoicoa, Tri-

nidade zori onecoā, zuri bacarric alabanza, honra, virtutia, ta gloriya oraṅ ta beti.

## 41 CAPITULOA.

*Munduco honra guztiya despreciatu bear dala, edo ez dala penatu bear desprecioacgatic.*

*J.* Cristaū maitea, etzaitecela penatu, besteac honratuac, ta alabatuac, ta zu despreciatua, ta humillatua cerala icusiagatic. Jasozazu zure biotza nigana Cerura, ta etzaituzte personen desprecioac penatuco. *C.* Jauna illumbetan vici guera ta laster engañatcen gaitu vanidadeac. Ondo beguiratcen baldin banaiz, aitortu bear det, etzaidala oraindic iñongo creaturagandic videgabequeriric eguin, ta orregatic ez det zugatic quejatceco motivo justuric. Baña cer-

gatic asco, ta ascotan ofenditu izan zaituran, orregatic armatcen dira arrazoyarequin creatura guztiyac nere contra. Niri bada arrazoyarequin zor zait lotsa, ta despreciosa, baña zuri alabanza, honra, ta gloriya. Eta ez baldin banaiz prestatcen criatura guztiyagandic gustora despreciatua, ta desamparatua, nai izatera, ecin nere barrenen paquetu, ta sendotu ninteque, ezta ere arguitu, ta zurequin osotoro bateguin.

## 42 CAPITULOA.

*Ez degula personetan gure paquea ipiñi bear.*

*J.* Cristau maitea, zure paquea personen batequin zure iritziyagatic, edo vicitciagatic ipintcen badezu, aldacorra, ta libertade gabea izango cera. Baña ipintcen badezu beti vici, ta irauten duen

eguiyan, ez dezu ilteen dan adisquideagatic penarie artuco. Nigan egon bear du adisquidearen amorioac, ta nigatic izan bear du amatua zuri ona, ta ehit maitagarriya iruritcen zaitzun mundu onetaco eroceñ. Ni gabe ez du valio, ta ez du ere iraungo adisquidetasunac, ez da ere amorio garbiya, nic batutcen ez derana. Añ illa egon bear dezu persona maitcen aficio orietara, ce (zugan dancz) personen compañiaric gabe egon naico cenuquela. Cembat eta munduco consuelo guztitic gueyago apartatcen dan persona, ambat eta Jaungoicoagana gueyago allegatcen da. Eta cembat eta beerago beregan jassten dan, ta bere buruarentzat gueyago despreciatcen dan, ambat eta gorago igotcen da Jaungoicoagana. Baña bere burubari onen bat egozten dionac,

Jaungoicoaren graciya beragana etortcia eragozten du, zergatic Espiritu Santuaren graciyac biotz humilla nai du beti. Bear bezala humilduco baldin baciñaque, ta criaturen amorio guztitic garbituco baldin baciñaque, graciya andiya emango nizuque orduan. Beguiratcen dezunian zuc criaturetara, quentcen zaitzu Creadorcaren vista. Icasizazu gauza guztiyetan Creadoreagatic ventzutcen, ta orduan allegatu zaitezque Jaungoicoaren ezaguerara. Dan guchiyena izanagatic ere, bear ez dan moduan amatcen, edo beguiratcen bada, atceratcen du Jaungoicoagandic, ta calte eguiten du animan.

## 43 CAPITULOA.

*Jaquinduriya zoro, ta mundutarraren contra.*

J. Cristau maitea, etzaitzatela

muguitu personen itz eder, ta jaquinduriya andicoac, cergatic *ez dago Jaungoicoaren Erreinoa itzan, ezbada virtutian.* Parazazu atencioa nere itcetara, ceñac sututcen dituzte biotzac, ta adimentuac arguitcen dituzte, eracartcen dute pecatuen damua, ta animaco consueloa. Ez dezazula jaquintsuagoa izatiagatic, (esan nai det) irurítciagatic, iñoiz ecer iracurri. Trabajazazu zure vicioen mortificacioan, cergatic, orrec gueyago valioco dizu, dificultade ascoren ezaguerac baño. Asco iracurtcen, ta ezagutcen dezunian, principio, edo asiera batera biurtu bear dezu beti. Ni naiz guizonari jaquinduriya eracusten diorana, ta guizonàc eracutsi dezaquién baño ezaguera andiyagoa humillai ematen diet. Nic itz eguiten diorana, laster jaquintsua izango da, ta ascò

aurreratuco du espirituan. ¡ Ay gauza alfer asco guizonai galdetcen dietenaz, ta ni servitceco videaz casoric eguiten ez dutenaz! Etorrico da dembora, ceñian aguertuco da Maisu guztiyen Maisua Jesus, Ainguceruen Jauna, guztiyen leccioaç entzuteco, au da bacoitzaren concienciac esaminatceco: orduan esaminatuco du zorrotz guztien vicitza, ta aguertuco dira oraiñ illumbetan dauden gauzac, ta issilduco dira mingañen arguimentuac. Ni naiz entendimentu humilla jasotcen derana, amar urtean estudioetan ibilli danac baño, betico eguiyaren arrazoi gueyago instante batian ezagutu ditzan. Itcen bullaric gabe eracusten det nic, iritziyen naspillaric gabe, honraren soberbiaric gabe, arguimentuen ez da baidaric gabe. Ni naiz munduco gauzac despre-

ciatcen, ta ayen gogoric edo deseoric ez izaten, eracusten derana, ta aben lecuan beticòac billatcen, ta gustatcen. Honrai igues eguiten, despreciacioac sufritcen, esperanza guztiya nigan ipintcen, nitzaz campora ecer ez deseatcen, ta gauzà guztiyaz gañ ni gogotic amatcen. Cergatic, persona batec ni biotz guztitic amatuaz, icasi cituen jaungoicozco gauzac, ta gauza miragarriyac esaten cituen. Gueyago aurreratu zuen guztiyac utciyaz, dificultade andico gauzac estudiatcen baño. Baña batzuei gauza regularrac itz eguiten disquiet, besteai particularrac; batzuei señale, ta figuretan gozotoro aguertcen natzaye, baña besteai argüitasun andiyan aguertcen dizquiet misterioac. Itz bat da libruben a, baña ez die guztiyai berdin eracusten, cergatic ni naiz barre-

nen eguiyaren eracuslea, ta biotcen esaminatzallea, pensamentuen entenditzallea, ta obren muguitzallea, deritzaran moduan guztiyai ematen dierala.

## 44 CAPITULOA.

*Ez dituela cristau espiritualac animaz campoco gauzac bereganatu bear.*

1. Cristau maitea, asco gaucetan, ez jaquiña izatia conveni zaitzu, mundu onetan illa bezala zure buruagatic pensatcia, ta mundu guztiya zuretzat crucificatua baldin balegoque bezala. Preciso da ere, asco gaucetan ez aditu eguitea, ta gueyago pensatcia, zure paqueraco conveni diranac. Gueyago valio du gustatcen ez diran gaucetatic beguiyac apartatcia, ta bacoitzari bere iritziya utcitcia, ez

da baidetan ibilteciaebaño. Jaungoicoarequin ondo egoten baldin bacera, ta aren juzguari beguiratcen badiozu, ventzutua izatia, errazago sufritucoꝺezu. ¡O Jauna, certaraño allegatu gueran! Orra munduco gaucen calteagatic negar eguiten da, erabaci pisca bategatic necatcen da, ta ibiltcen da, ta animaco caltean eada casoric eguiten, doy doya iñoiz gogoratcen da, apenaz iñoiz: Guchi, edo batere valio ez duena beguiratcen da, ta guztiz bearra dana aisa aztutcen da; cergatic persona guztiyac campoco gaucetara zabaltcen dira, ta laster beregan biurtcen ezbada, campoco gaucetan eroririk gustora egongo da.

## 45 CAPITULOA.

### *Etzayela guztiai sinistu bear, eta ceñ erraz itzquetan uts eguiten dan.*

C. Laguntzadazu, Jauna, nere nequean, cergatic, ez du ecer valio guizonaren seguridadeac. ¿Cembat bider laguntcea topatu uste nuen lecuban, ez nuen topatu? ¿Ta topatuco ez nuela uste nuen lecuban, topatu nuen? Ez da bada guizonetan cer confiaturic, zugan dago Jauna, zugan justuen osasuna edo laguntza. Bedeicatua izan zaitecela, nere Jaun, eta Jaungoicoa, niri guertatcen zaizquiran gauza guztiyetan. Eriyac, ta aldacorrac guera, laster engañatcen guera, ta aldatcen guera. ¿Ceñ person da gauza guztiyetan an contu, ta beguiratce audiyarequin guardatcen dana, ce ez dalá noiz

bear ez dan gauzaratutcen? Baña zugan confiatcen duena, Jauna, ta biotz garbiyarequin billatcen zaituena ez da añ erraz erortcen. Eta nequeren batian erortcen baldin bada ere, nola nai artan lotua izan dedilla, lasterrago izango da zugandic libratua, edo consolatua, cergatic ez dezu zuc zugan confiatcen duena, azquenerano desamparatuco, laster lagunduco diozu. Guchi da bere adisquideen estutasun guztiyetan leyala irauten duen adisquideric. Zu, Jauna, zu bacarric cera ecin gueyagoraño leyala gauza guztiyetan, ta zutzaz campora ez beste alacoric. O cein ondo entenditu zuen, araco anima santa esan zuen arc: Nere anima Jesusegan sendotu, ta cimentatu da. Nerequin orrela, baldin balitzaque, ez nuque criaturacgatic bildur asco izango, ta ez-

nuque ayen nere contraco esan gaiztoagatic caso 'asco eguingo. ¿Norc alde aurretic gauza guztiyac ezagutu ditzaque? Nor, etorri ditezquien, gauza guztiyetatic guardatu diteque? Alde aurretic ezagutuac ere caltea eguiten badute, ¿cer eguingo ez dute ezagutu gabeac? ¿Baña cergatic nere burubari ez nion obeto beguiratu? ¿Eta cergatic ere besteai añ erraz sinistu nien? Baña guizonac guera, ta ez beste gauzaric, guizon argalac, ta ez Ainguerúac, Erligioric dan estuenian vicituagatic ere, ta santidaderic andiyenian egonagatic ere.

¿Nori sinistuco diot, Jauna, nori ezbada zuri? Ecin iñor engañatu, ta cerori ere ecin engañatu zaitezquien eguiya cera zu. ¿Baña guizona? Guztiyac guezurtiyac, eriyac, aldacorrac, ta eror-

corrac batez ere icetan, alaco moduan, ce doy doya sinistu diteque bereala lembicico vistan, gauza ona diruriena ere. ¡Ceñ arrazoi andiyarequin guizonetatic guardateco consejatu cenuen! Eta cergatic guizonaren etsayac bere echecoac diran; ezda ere sinistu bear, norbaitec esanagatic, ona emen, edo, ara an. Nere calteaquin berarequin eracutsiya izan nais, ta ojala, ni contuzcoagoa eguiteco, ta ez lenago beceñ prudencia guchicoa izateco. Izan zaitez contuzcoa, izan zaitez contuzcoa, esan zuen batec, gordezazu zugan esaten derana. Eta nic issillic daucadan bitartian, ta iñorc ez daquiela uste deran bitartian, issillic iruquiteco esan ciranac berac ecin issillic iruqui du, ezbada bereala, bera, ta ni aguertcen gaitu, ta joan zan. Guardazazan,

Jauna, onelaco contuetatic, ta contu gabeco personetatic, ayen escubetan erori ez nadin, ta orrelaco gauzaric iñoiz eguin ez dezadan. Emayozu nere aboari itz eguiyazcoa, ta iraucorra; ta mingaña engañagarriya nigandic arruti quenzazu. Padecitu nai ez deranetic guztiro guardatu bear naiz. ¡O ceñ gauz ona, ta paquetsua dan besteacgatic issillic egotia; ta ez erraz eroceñ gauza siniztea, ta ez erraz guero contatcia, guchiri bere barrena aguertcia, ta beti zu biotzaren contu artzallea, billatcia; eroceñ itcez ere ez muguitcia, ezbada barrengo, ta campoco gauza guztiyac, zure gustoa dan bezala, eguitia deseatcia! ¡Ceñ gauza segurua dan, Ceruco graciya conservatciagatic, cerbait dalacotzat aguertcetic igues eguitia, ta campotic arriteecoac dirurite

gauzac ere: eguitia ez deseatcia, ezbada vicitzaren emiendara, ta Jaungoicoaren servicioan empleatcera muguitcen duten gauzac cuidado andiyarequin seguitcia! ¡O cembati calte eguin dion virtute agueriyac, ta dembora baño lenago alabatuac! ¡Baña contrara, cembati aprovechatu cion tentacioa, ta guerra baicic ez dan vicitza miserable onetan issillic gordericaco graciyac!

## 46 CAPITULOA.

*Jaungoicoagan confiatu bear degula, gugatic besteac gaizqui esaten dutenian.*

J. Cristau maitca, egon zaitez sendo, ta esperazázu nigan; cergatic, ¿cer dira itzac, ezbada itzac? Aiciac eramaten ditu, ta arriyari, au da, biotz sendoari ez diote cal-

teric eguiten. Zure contra esaten danan, culpante cerala ezagutcen badezu, procurazazu gogoz emienda, ez baldin bacera culpante senti, procurazazu ori gogoz Jaungoicoagatic sufritcia. Ezda asco itzac badere noizbait sufritcia, oraindic azote gogorrac eein sufritu dituzun ezquero. ¿Eta cergatic aiñ guchic zure biotzari eraguiten dio, ezbada cergatic oraindic araguizcoa ceran, ta bear baño gueyago beguiratcen diezun persònai? Eta cergatic despreciatua izatia bildur ceran, zure faltacgatic iñorc erreprenditcia nai ez dezun, ta beti escusac billatcen dituzun. Baña beguira zaitez obeto, ta ezagutuco dezu, vici dala oraindic zugan munduari, ta persónai gusto eman nai zoroa. Cergatic, zure faltacgatic despreciatua, ta lotsatua izatetic igues eguin nai dezunian,

agueriyan dago, etcerala eguiyaz humilla, ta munduari illa, ezta ere mundua zuretzat crucificatua. Baña entzun zazu nere itza, ta ez dezu casoric eguingo personen itz guztiyacgatic. Pensazazu, pensa litezquien gauzaric gaiztoenac ere zugatic esanagatic, ¿cer calte eguin litzaquezu; pasatcen utcico bacenicque, ta lasto batez baño caso gueyago eguingo ez bacenuque? ¿Venturaz ille bat ere quendu litzaquezu? Baña biotz barreneronz, ta Jaungoicoa vistan ez daucana, erraz muguitcen da desprecioco itzaquin. Baña nigan confiatcen duena, ta bere iritzira egotia deseatcen ez duena, personen bildur gabe egongo da. Cergatic, ni naiz gauza escutu guztiyen jueza, ta ezagutzallea, nic daquit, nola gauza eguindan, nic ezagutcen det videgabequeriya eguiten

duena, baita ere sufritcen duena. Nigandic irten zuen itz onec, nere permisioz guertatu zan au, biotz ascoren pensamentuac aguertu ditecen. Nic juzgatuco ditut nola culpantea, ala culparic ez duena, baña nere juicio ezcutuagatic, lenago biac probatu nai izan ditut. Guizonen testimonioac ascotan engañatcen du, baña nere juzgoa eguiyazcoa da, seindo egongo da, ta ez da eceztuco. Gueyenian escutuan egoten da, ta guchic gauza guztiyetan ezagutcen dute, ez du orregatic ere iñoiz uts eguiten, juicio gabecoai ona ez iruritnagatic.

Nigana etorri bear da bada juzgo gaiztoetan, ta ezda bere juzgo, edo iritziyaz casoric eguin bear; cergatic ez da justua estutuco erocen gauza berari Jaungoicoagandic etorriagatic. Aren, edo

beraren contra arrazoi gabe cerbait esanagatic, ez du caso asco eguingo; ez da ere asco alegratuco besteac arrazoyarequin escusatuagatic ere, cergatic pensatcen du, ni naizala biotzac arguiro esaminatcen dituena, ta ez derala juzgatcen, personai gauza iruritcen zayen bezala; cergatic ascotan gaiztoa da nere beguietan, personai ona iruritcen zayena *C*. Nere Jaun, eta Jaungoicoa, juez justua, sendoa, ta sufritua, gure argaltasuna, ta gaiztaqueriya ezagutcen dezuna, izan zaitez arren nere indarra, ta nere confianza guztiya, cergatic ez da neretzat asco nere conciencia. Ezagutu dezuen zuc, nic ezagutu ez nuena, ta ala erocen erreprensiotan humillatu bear nintzan, ta pacienciarequin sufritu bear nuen; barcazadazu ere orrela eguin ez nuen guztiyagatic, ta

indazu sufrimentu andiyagoco graciya. Cergatic, obeagoa da neratzat zure misericordiya andiya, barcacioa alcantzatceco, nere concienciaren escutuagatic inocente naguela-co ustea baño. Concienciac ecertan ez erreprendituagatic, ecin orregatic ere onetan justificatu, edo aseguratu ninteque, cergatic zure misericordia apartatu ezquero, ez da zure aurrean persona bacar bat ere justificatuco.

## 47 CAPITULOA.

*Neque guztiyac Ceruco gloriyagatic sufritu bear dirala.*

J. Cristau maitea, etzaitzatela ecer eztu nigatic artu dituzun nequec, ta trabajuac; ta etzaitzatela ere animoa galduric utci, ezbada ocasio guztiyetan nere pro- Lezazu maiz, edo sarritan.

mesac indartu, ta consolatu bear zaitu. Nerau naiz asco, zuri eciñ gueyagorañó pagatceco. Etcera emen luzaro necatuco, ta etcera beti dolorearquin penatua egongo. Ichoronzazu pisca bat, ta laster icusico dezu zure gaitcen azquena. Etorrico da ordu bat, neque, ta bulla guztiya guelditueo dana. Gauza guchiya, ta laburra da demborarequin igarotcen dan guztiya. Eguizu, eguiten zaudena, trabajazazu nere servicioan, ni izango naiz zure sariya. Escribizazu, iracurrizazu, cantazazu, negar eguizu, zaude issillic, erreguzazu, sufritzatzu nequeac animo andiyarequin, mereci du Ceruco gloriyac, neque abec, ta andiyagoac beragatic artcia. Etorrico da paquea, Jaungoicoac daquien egun batian, ta izango da, ez dembora onetaco eguna, ta arratsa, ezbada

betico arguiya, ta edertasuna, paque iraucorra, ta descantsu segurua. Ez dezu esango orduan, *¿ norc libratuco nau eriotz onetaco gorputcetic?* Ezta ere: *¡ ay nere errucarriya, cergatic, nere destierroa luzatu da!* Cergatic acabatuco da eriotza, ta iñoiz acabatuco ez dan osasuna izango da; estutasunic batere ez, utseguiñ zori onecoa, compañia gozoa, ta honrosoa.

Ay baldin icusi izan bacenitu Ceruan Santuen betico coroac, ta ceñ gloriya andiyan orañ gozatcen diran, munduarequico despreciyagarriyac, ta vicitcia ere mereci etzutela juzgatcen ciranac, humilduco ciñaque duda gabe lurrerañio, ta nayago izango cenuque guztien mendean, edo obedienciañ vici, baten bacarraren ere aguintari izan baño; etcenituque

ere munduco egun alegreac deseatuco, ezbada nayago izango cenuque Jaungoicoagatic penatua izan, ta erabaci anditzat iruquico cenuque; ecer ezatzat persònac zu iruquitcia. ¡Ay baldin gauza abec gustatuco balitzaitcitzuque, ta biotzaren barreneraño igaroco balitzaitcitzuque! ¿Nola atrebituco ciñaque orduan beñ bacarric ere quejatcera? ¿Ez dira venturaz Ceruco gloriyagatic neque guztiyac sufritcecoac? Ez da gauza despreciyagarriya Ceruco gloriya galtcia, edo erabaztia. Alchazazu bada Cerura zure arpeguiya. Orra ni, ta nerequin batian Santu guztiyac, mundu onetan pelea andiya izan zutenac, orain gozatcen dira, orain consolatcen dira, orain seguru daude, orain descantsatcen dira, ta nere Aitaren Erreinoan nerequin beti vicico dira.

## 48 CAPITULOA.

### *Eternidadeco egunaren, ta vicitza onetaco miseriyen gaìnian.*

O Ceruco gloriyaco vicitza guztiz zori onecoa! O eternidadeco egun guztiz arguiya, gabac iñoiz illuntcen ez duena, ezbada eciñ gueyagorañoco arguiyac beti arguitcen duena, egun beti alegrea, beti segurua, ta iñoiz contrara aldatcen ez dana. Ojala aguertua balegoque egun ura, ta mundu onetaco gauza guztiyac acabatuac. Argui eguiten die bai Santuai argui ederrarequin, baña ez mundu onetan vici diranai, urrutitic, ta ispilluan bezala ezbada bestela. Ceruan vici diranac badaquite, ceñ zori

Lezaza maiz, edo sarritan.

onecoa dan egun ura. Evaren hume desterratuac negar eguiten duto, samiña, ta enfadagarriya dala vicitza aú esperimentaturic. Mundu onetaco egúnac chiquìyac eta gaiztoac, penaz, ta estutasunez beteac, ceñian persona, asco pecaturequin ciquintcen da, asco pasiorequin nastutcen edo lotutcen da, bildur ascorequin estutcen da, cuidado ascorequin necatcen da, vanidade ascorequin nastutcen da, engañio ascorequin ichutcen da, neque, ta tentacio ascorequin penatcen da; gustoaquin argaltcen da, ta beartasunarequin tormentatcen da.

¡O ¿noiz acabatuco ote dira gaitz abec? ¿Noiz libratuco ote naiz vicioen mende negargarritic? ¿Noiz acordatuco ote naiz, Jauna, zutzaz bacarric? ¿Noiz osotoro zugan alegratuco ote naiz? ¿Noiz

egongo ote naiz eguiyazco libertadian eragozquetaric, ta animaco, ta gorputceco nequeric batere gabe? ¿Noiz izango ote da paque sendoa, paque iraucorra, ta segurua, paquea barrendic, eta campotic, ta alde guztiyetatic sendoa? O Jesus ona, noiz icusico ote zaitut? ¿Noiz gozatuco ote naiz zure gloriyan? ¿Noiz izango ote cera neretzat gauza guztiyac guztiyetan? O! ¿noiz egongo ote naiz zurequin, zure escogituentzat eternidadetic prestatu cenuen zure Erreinoan? Pobre, ta desterratuac utciya izandu naiz etsayen erriyan, ceñian eguneroco guerrac, ta ecin gueyagorañoco desgraciyac icusten dira.

Consolazazu nere destierroa, gozazazu nere pena, cergatic zugana dijoa nere deseo guztiya: cergatic mundu onec consuelotzat escain-

tcen diran guztiya, neretzat nequea da. Zu gozatcia deseo det, baña ecin artu zaitut. Ceruco gaucetan nere biotza iruquitcia deseatcen det, baña munduco gauzac, ta mortificatu gabeco griña gaiztoac eragozten dirate. Nere animaz gauza guztiyen gañ egon nainuque, baña araguiyac, nai ez derala, azpiyan egotera obligatcen nau: Onela nic, miserable onec nere burubarequin peleatcen det, ta nere burubarentzat necosoa eguin naiz, espirituac goronz, ta araguiyac berontz egotia procuratcen duenian. ¡O cer padecitcen deran barrenen Ceruco gauzac pensatcen nagoenian, ta oracioan nagocla, bereala munduco gauzac gogoratcen zaizquidanian! *Etzaitecela arzon, nere Jaungoicoa, nigandic urruti joan, ta etzaitecela zure aserrean zure ser-*

*vitzariyagandic apartatu.* Biàlzadazu, Jauna, zure arguiya, ta quentcitzu orrequin etsayac buruora ecartcen dizquiran imaginacio guztiyac. Bildutcitzu nere sentiduac zugana, munduco gauza guztiyaz aztueraci nazazu, ta indazu graciya, vicioen tentacio guztiyac nigandic lembaitlen botatceco. Lagunzadazu, betico eguiya, vanidade bat bacarrac ere muguitu ez nazan. Atoz, Ceruco atseguintasuna, ta igues eguin beza zure vistan ciquintasun guztiyac. Barca zadazu ere arren zutzaz campora oracioan pensatu deran guztiya. Aitortcen det, ascotan divertitua egondu naizala, cergatic eznago ascotan, gorputcez nagoen lecuban, ezbada pensamentùac nora eramaten nauten, an. Nere pensamentua dagoen lecuban nil gre nago, ta amatcen deran gau-

na dagoen lecuban, dago ere maiz nere pensamentua. Beréz atseguiñ ematen duena, edo costumbrez gustatcen zaitadana, laster gogoratcen zait. Orregatic, zuc, eguiya bera cerana, claro esan cenuen: *Non dagoen zure tesoroa, an dago ere zure biotza.* Cerua amatcen baldin badet, ango gaucetan gustora pensatcen det; mundua amatcen baldin badet, munduco zori onaz gozatcen naiz, ta ango nequeaz tristatcen naiz. Araguiya amatcen baldin badet, araguizco gaucetan ascotan pensatcen det. Espiritua amatcen baldin badet, gauza espiritualetan pensatcia gustatcen zait. Cer amatcen ditudan bada, ayen gañian gustora itz eguiten det, ta orrelacoen imaginacioac nerequin echera eramaten ditut. Baña zori onecoa, Jauna, zugatic munduco gauza guz-

tiyac beregandic despeitcen dituena, bere burubari indar eguiten diona, ta espirituco subarequin bere griña gaiztoac crucificatcen dituena, orrela conciencia sosegaturic, oracio garbiya zuri escañi dizazun, ta munduco gauza guztiyac campotic, ta barrendic despeituric, Ainguerruen artian vicitcia mereci dezan.

## 49 CAPITULOA.

*Ceruco gloriyaren deseoaren gañian, ta ceñ andiyac diran argatic peleatcen dutenentzat aguinduac dauden ondasunac.*

*J.* Cristau maitea, betico zori onaren deseoa Jaungoicoac ematen dizula biotcian sentitcen dezunian, ta itzal gabeco nere arguitasuna icusteco gorputcetic irtetia deseo

dezunian, zabalzazu zure biotza, ta errecibizazu gusto guztiz andiyarequin Jaungoicoaren muguimentu au. Emayozcatzu ecin gueyagoraſñoco esquerrac Jaungoicoaren ontasunari, ceñac orreŋi amorio andiya aditcera ematen dizu; aimbeste misericordiarequin visitatcen zaitu, gogotic muguitcen ta jasotcen zaitu, cere cargarequin lurreco gaucetara erori etzaitecen. Cergatic ez dezu au zure pensamentu, edo indarraquin errecibitcen, ezbada, bacar bacarric Jaungoicoaren misericordiagandic datorquizu, virtutietan, ta humildadean aurreratu zaitecen, izango dituzun peleataraco presta zaitecen, ta niri biotz guztitic allogatcia, ta servitcia procura dezazun. Cristau maitea, ascotan subac su eguiten du, baña ez da queriç gabe gora jaiquitcen, ala ascoren deseoac Ce-

ruraco irazaquitcen dira, baña orregatic munduco gaucen deseoco tentaciotic libre ez daude, ta orregatic ez dute Jaungoicoaren honra utsagatic eguiten, aiñ gogotic berari escatcen diotena; alacoa ere da ascotan aimbeste bider aditcera eman dirazun zure deseoa, cergatic ez da garbiya, ta perfectoa bere burubarén convenienciarequin nastua dagoen deseoa. Escazaz ez zure gustocoa, ta convenienciacoa dana, ezbada nere gustocoa, ta honratecoa dana, cergatic bear dan bezala juzgatcen badezu, zure deseo, ta deseatcen dezun guztiya baño lenago estimatu, ta eguin beardeca nere vorondatia.

Ezagutu nuen zure deseoa, ta entzun nituen maiz eguin dituzun negarrac, egon naiz Icenduque ya Jaungoicoaren semeen gloriyan

ren libertadian, alegratceu zaitu betico echeac, ta consueloz beteric dagoen Ceruco erreinoac, baña ezda oraindic ordu au allegatu, ezbada beste demboraric da oraindic, au da, guerraco, necatceco, ta probatceco dembora. Ecin gueyagoco onàz betea izan nai dezu, baña ecin au orain alcantza dezaquezu. Ni naiz, ichoron zadazu, dio Jaungoicoac, Jaungoicoaren erreinoa etorri artian. Munduan oraindic probatua, ta gauz ascotan egercitatuà izan bear dezu. Noician bein consolatua izango cera, baña ez betico asea. Animatzaitez bada, ta izan zaitez sendoa; nola eguiten zure amorio propioaren contraco gauzac, ala padecitcen. Preciso da guizon berri bat eguin, ta beste guizon batian aldatcia. Preciso da, zuc ascotan nai ez dezuna eguitia, ta nai de-

zuna eguin gabe utcitcia. Besteai gustatcen zayena aurrera joango da, zuri gustatcen zaitzunac ez du pausoric emango besteac esaten dutena entzuna izango da, zuc esaten dezunaz ezda casoric eguingo: escatuco dute besteac, ta logratuco dute, escatuco dezu zuc, baña ez dezu logratuco. Andiyac izango dira besteac persònen aboan, baña etzaitu zu iñore autan artuco: besteai au edo bestea encargatuco zaye, baña zu ecertaraco ez baciñaque bezala; utriya izango cera, orregatic zure amorio propioa noizbait tristetucó da, ta ez da guchi izango issillic sufritcen badezu: Gauza abetan, ta beste onelaco ascotan probatua izaten dà Jaungoicoaren servitzari leyala, nola gauza guztiyetan bere buruba ucatcen ote duen icustero. Apenaz dau gauzaric, ceñian aima-

beste premiya, dezun iltcia, nola zure vorondatearen contraco gauzac icustea, ta padeciltçia; ta bañez ere conveni ez dirala, ta bestera eguitia conveniago dala iruritcen zaizquitzun gauzac eguiteco, aguintcen zaitzunian. Eta cergatic, besteren mendean egonic, zuc baño aguintce gueyago duenari contra eguitera atrebitcen etceran, orregatic iruritcen zaitzu gogorra besteren vorondatera vici bearra, ta guztiyan zure iritziya utci bearra. Baña pensazazu, cristau maitea, neque aben frutua; laster acabatuco dirala, ta emango zaitzun sari guztiz andiya, ta ala ez dezu izango nequeric, ezbada zure pacienciaren consuelo guztiz sendoa; bada zure vorondatez utcitçen dezun vorondante dan chiquiyenagatic ere, izango dezu betè zure vorondatia Ceruan; cergatic

an topatuco dezu nai dezun guztiya, ta deseatu aldezaquezun guztiya. Zure escuban izango dezu an on guztiya, galtceco bildurric gabe.

An zure vorondatea nerequin beti bat, ez du nere vorondatea beste gauzaric deseatuco. Ez dizu an iñorc contra eguingo, ez da iñor zutzaz quejatuco, ez du inorc, ta ecerc eragotcico, ezbada deseatcen diran gauza guztiyac batian presente egongo dira, ta zure deseo guztiya aseco dute, ta ecin gueyagoraño bèteco dute. An emango dei gloriya, sufritu zan falso testimonioagatic, alabanza; desprecioacgatic, ta azquenèco eser lecubagatic, erreinoco betico eser lecuba. An aguertuco da obedienciaren frutua, penitenciaco nequieàc gustoa emango du, ta besteri humil sujetatcia gloriyaz coroatua izango

da. Sujeta zaitez bada orañ humil guztiyen mendera, ta ez dezazula beguiratu, norc au edo bestea aguindu zuen, ezbada onetan izan zazu cuidado guztiz andiya, ce dala zure aguintariyac, dala zu baño guchiyagocoac, dala igualac cerbait eguitero aguintcen dizunian; edo aditcera ematen dizunian, guztiya ontzat artu dezazula, ta procura dezazula voron-date onarequin cumplitcia. Billa beza onec au, besteac ura, gloriya bedi ura artan, ta bestea onetan, ta alabatua izan dedilla milla bider milletan, baña zu ez onetan, ta ez artan, ezbada zure burubaren desprecioan, ta nere gusto, ta houran bacarric goza zaitez. Au deseatu bear dezu zuc, dala vicitzagatic, dala eriotzagatic, Jaungoicoa zugan glorificatua izatia.

## 50 CAPITULOA.

*Nola espirituan penatua, ta consuelo gabe dagoen persona Jaungoicoaren escubetan jarri bear dan.*

C. Bedeicatua izan zaitecela orañ, ta beti nere Jaun, eta Jaungoicoa, cergatic zuc nai izan dezun bezala eguinda, ta zuc eguiten dezuna gauz ona da. Alegra bedi zugan, ta ez beregan, edo besteren batean zure servitzariya, cergatic zu bacarric cera eguiyazco alegriya, zu nere esperanza, ta nere coroa; zu, Jauna, nere consueloa, ta nere honra. ¿Badu venturaz zure servitzariyac bere merecimenturic gabe zugandic artu zuena besteric? Zureac dira eman cenituen, ta eguin cenituen guztiyac. Pobrea naiz ni, ta nere gaztetasunetic nequeetan vici naiz, ta negan

eguiterañó penatcen da ascotán nere anima, bere pasio gaiztóac-gatic ere ascotan bere artian pe-natcen da. Paquearen poza deseo det, zure consueloaren arguiyan gozatcen diran zure semeen pa-quea escatcen det. Paquea ematen baldin badezu, consuelo santua biotcera issuritcen badezu, ale-griyaz betea egongo da zure ser-vitzariyaren anima, ta zure ala-bantcetan devotoa izango da. Baña ascotan bezala apartatcen bacera, ez da erraz ibillico zure manda-mentuen videan, ezbada bere pe-chua jotceco belaunico jarrico da, cergatic ez dijoaquio atzo, ta eren egun beceñ ondo, zure arguiyac aren gañian argui eguiten zue-nian, ta tentacioetatic zure ega-pean guardatcen zanian bezala. Aita justua, ta beti alabatcecoa, etorri da zure servitzariya pro-

batceco orduba. Aita maitagarriya, arrazoi da, zure servitzariyac ordu onetan zugatic cerbait padecitcia. Beti erreverentciatua izatia mereci dezùn aita, allegatu da, etorrico zala eternidadetic cenequizun orduba, zure servitzariya campotic pisca bateco erori dedin, baña barrendic beti zugan vici dedin. Izan bedi pisca batian humildua, tà despreciatùa, ez dezatela ere persònac ecertan iruqui, pasio, tà animaco gaitzaquin penatua izan bedi, berriz zurequin zure argui berriyan jaiqui dedin, ta Ceruco gaucetan arguitua izan dedin. Aita santua; zuc orrela disponitu cenuen, orrela nai izan cenuen, ta cedorrec aguindu cenuena eguin da. Au da zure adisquideari eguiten diozun mesedea, zugatic padecitcia, ta mundu onetan penatua izatia, oni eguitia.

permititcen dezun guztiyan, ta eguiten duen eroceñengandic. Zure conseju gabe, zuc disponitu gabe, ta motivoric gabe, ez da munduan ecer guertatcen.

On da neretzat, Jauna, zuc humiltcia, icasi ditzadan zure mandamentuac, ta bota ditzadan soberbiya, ta presuncio guztiyac. Provechu izan da neretzat, lotsatua izatia, ez persònac, ezbada zu, nere anima consolatceco billa zaitzadan. Icasi det ere onetatit zure juicio estaliyaz bildur izaten, cergatic justua gaiztoarequin *batian* penatcen dezu, baña beti arrazoyarequin, ta bear dan moduan. Esquerrac ematen dizquitzut, cergatic ez diezun nere gaitzai barcatu, ezbada azote samiñaquin penatu nazu campotic, ta barrendic doloreac, ta naigabeac bialduaz. Ez da Ceruaren azpian:

ni consola nazaquenic, ezbada zu, nere Jaun, eta Jaungoicoa, animen Ceruco medicoa, golpatcen, ta sendatcen dezuna, pena andiyetan ipintcen, ta ayetatic ateratcen dezuna: zure cigorra nere gañian, ta berac eracutsi dit. Orra, aita maitea, zure escubetan nago ni, zure erreprensioco cigorraren azpian jartcen naiz ni, joteitzu nere espaldac, ta lepoa, nere oquertasuna zure vorondatera zucen dezadan. Eguin nazazu disciPulo devoto, ta humilla, ondo eguitia costumbratu izan dezun bezala, zure vorondate guztiya beti eguin dezadan. Zure escubetan ni, ta nere gauza guztiyac corregitceco, edo cenzatceco paratcen ditut. Obe det emen errepreuditua, ta castigatua izan, beste munduan baño. Badaquizquitzu zuc gauza guztiyac, eta

baroitza; eta etzaitzu gure concienciaan ecer escutatcen. Guertatu baño lenago, ezagutu cenituen etorri bear zutenac, ta ez dezu munduan guertatcen diran gauzaz iñorc eracusteco, edo consejatceco premiyaric. Zuc daquizu nere provechuraco cer conveni dan, ta cembat valio duen trabajuac, vicioen ordoitic cristava garbitceco.

Eguizu nerequin zure gustoa, eguizu deseo dezuna, ta ez dezazula despreciatu, zuc beceñ ondo iñorc ezagutcen ez duen nere pecatuzco vicitza. Indazu jaquin bear derana jaquitia, amatu bear derana amatcia, zuri asco gustatcen zaitzuna bacarric alabatcia, zuri estimagarriya iruritcen zaitzuna bacarric estimatcia, zuri gustatcen etzaitzuna bacarric despreciatcia. Ez dirazazula utci campotic icusten

danaz bacarric juzgatcen, ezta ere ezaguera gabecoen belarriyac entzuten dutenaz bat, ezbada indazu graciya, gauza corporal, ta espiritual guztiyac beardan bezala juzgatceco, ta guztiyen gañ zure gustoa cer dan beti billatceco. Ascotan engañatcen dira juzgatcen, personen sentiduac, engañatcen dira ere munduaren amantiac munduco gauzac bacarric amatcen. ¿Cergatic da obeagoa persona, persònac obeagoa dala pensatcen dutelaco? Engañatiyac engañatiya, vanoac vanoa, ichuac ichua, eriyac eriya engañatcen du, alabatcen duenian, ta gueyago eguiyaz lotsatcen du orrela motivo gabe alabatcen duenian. Cergatic, cembat dan, Jauna, bacoitza zure beguiyetan, aimbeste da, ta ez gueyago, esan zuen San Francisco humillac.

## 51 CAPITULOA.

### *Andiyac falta diranian, obra humilletan empleatu bear dala.*

*J.* Cristau maitea, ecin iraungo dezu béti, virtutien deseo irazaquiyan, ezta ere Ceruco gaucen consideracio arguituan, ezbada Adanen pecatuaren motivoz jachico da nai ta nai ez zure pensamentua gauza bajuetara, ta eraman bearco dezu nai ta nai ez, ta gogoaren contra vicitza miserable onen carga. Gorputz ilcor orrequin zabiltzan bitartian *biotceco* nai gabea, ta carga sentituco dezu. Preciso da bada, gorputcian gorputzaren cargaz quejatcia, cergatic animaco gaucetan, ta Jaungoicoaren consideracio arguituan ecin beti egon ceran. Orduan gauza bajuetan, ta obra onetan empleatcia, conveni zaitzu,

ta nere etorrera, ta Ceruco visita confianza sendoarequin ichorotia, zure destierroa, ta animaco legortasuna paciencia andiyarequin eramatia, berriz nigandic visitatua, ta pena guztiyetatic libratua izan zaitecen artian; cergatic, azturacico zaitut nequeaz, ta animaco paqueaz gozaeracico dizut. Zabalduco ditut zure beguiyetan Ceruco eguiyac, orrela biotza lasaituric, nere mandamentuen videtic neque gabe ibilli zaitecen, ta esango dezu: *mundu onetaco penac ecer ez dira emango zaigun Ceruco gloriyaren aldean.*

## 52 CAPITULOA.

*Ez duela, consueloric mereci duela, pensatu bear cristabac, ezbada, castiguac.*

C. Jauna, ez det zure consueloric,

ta beste visita espiritualic mereci, ta orregatic bear bezala eguiten dezu nerequin, pobre, ta consuelo gabe utcitcen nazunian: cergatic itzasoa dan arimbat negar eguin albanezaque ere, ez nuque zure consueloa merecitceco arimbat eguingo. Ez det nic azotatua, ta castigatua izatia baicic mereci, cergatic asco ta chit ascotan ofenditu izan zaitut, ta chit asco gaucetan faltatu det. Eguiyazco arrazoyari beguiratu ezquero bada, dan consueloric chiquiyena ere ez det mereci: Baña, zuc nere Jaungoico on, ta erruquitsoa, zure obrac galtcia nai ez dezuna, zure ontasun andiya criatura ecer ecetan beren merecimenturic gabe agaertciagatic, consolatu nai izan dezu ecin esan ditequien bezala zure servitzariya, cergatic ez dira zure consueloac munduco persò-

nen conversacioac bezala. ¿Cer eguin izan det nic, Ceruco consuelo ecer ez bat ere zuc niri emateco? Ez naiz acordatcen gauz onic eguin derala, ezbada beti vicioetara macurtua, ta emendatceco naguiya izandu nazala. Eguiya da au, ta eciñ uca nezaque: beste modutan esango banuque, zu nere contra egongo ciñaque, ta ez litzaque norc defenditu izango. ¿Cer merecimentu izan det nere pecatuegatic, ezbada infernua, ta betico suba? Eguiyaz aitortcen det, mereci derala erocen desprecio, ta ez diruri ondo ni zure devotoen artian egotia. Ta ez baldin badet ere au gustora entzuten, orregatic ere eguiyagatic esango ditut nere contra nere pecatuac, zure misericordia errazago alcantzatcia, mereci dezadan. ¿Cer esango det gaizquille, ta lotsa guztiyaz bete,

onec? Ecin beste gauzaric esan dezaquet, ezbada pecatu eguin nuen, Jauna, pecatu eguin nuen, erruqui zaitez nitzaz, barca zadazu arren. Utci zadazu *pisca bat nere penagatic negar eguin dezadan, erri illun, ta eriotzaren illuntasunez estalira joan nadin baño lenago.* ¿Cer escatcen dezu gueyago pecatari miserableagandic, ezbada damutu, ta humildu dedilla bere pecatuacgatic? Eguiyazco damuan, ta biotceco humildadean, jayotcen da barcacioaren esperanza, concienciaren paque eguiyazcoa, ere alcantzatcen da, galdu zan graciya atcera erabazten da, guardatcen da persona Jaungoicoaren gueroco aserretic, ta Jaungoicoac, ta anima penitenteac alcarri laztan santua ematen diote. Pecatuen damu humilla zure gustoco ofren-

da da Jauna, incensoàc baño usai obea zure aurrean banatcen duena. Au da zure gustoco uquendua, zure oñ sagraduetan issurtcia nai izan cenuena, cergatic biotz damutu, ta humilla etzcenuen iñoiz despreciatu. An dago etsayaren aserrearén vistatic igues eguiteco lecuba. An quentcen, ta garbitcen da, bestetan berenganatu, ta ciquindu zana.

## 53 CAPITULOA.

*Ez duela Jaungoicoaren graciyac munduco-gauzac gustatcen zaizcatenaquin egon nai izaten.*

J. Cristau maitea, alacoa da nere graciya, ce ez du beste gauzaquin, ta munduco consueloaquin batian egon na izaten. Bota beardituzu bada zugandic graciyaren contraco gauza guztiyac, bera err-

recibitu nai baldin badezu. Billa zazu bacartasun edo erretiroa, amazazu zure burubarequin bacarric vicitcia, ez dezazula iñoren conversacioric billatu, ezbada escazayozu biotz guztitic Jaungoicoari biotz, pecatuen damuz penatua, ta conciencia garbiya. Ez dezazula ecertan ere iruqui mundua, beste gauza guztiyetan aurria Jaungoicoaren deyari emayozu, cergatic ecin nerequin tratatcen dezula, munduco gaucetan gozazaitezque. Ezagun, ta adisquideetatic apartatu bear dezu, ta munduco consuelo guztiyetatic biotza libre iruqui bear dezu. Ala erregutcen die San Pedroc cristàubai, esanaz, erregutcen dizutet erbestecoai bezala, aparta zaiteztela animaren contraco araguiyaren deseoetatic. O cer confianza izango duen il bear duenian, mundu one

taco gauza bacar baten ere aficioac guelditcen ez duenac. Baña gauza guztiyetatic biotza orreñ erantciya iruquitcia, ecin du oraindic anima argalac, ez du ere ezagutcen espirituala ez dan personàc, persona espiritualaren animaco libertadea. Orregatic ere eguiyaz espirituala izan nai baldin badu, nola aideacgandic, ala ez diranengandic apartatcia procuratu bear du, ta ez du bere burubagandic baño gueyago iñorgandic guardatu bear.

Cerori bear dan bezala ventzutcen bacera, errazago gañeracoac ventzutuco dituzu. Vitoria perfectoa da bere burubagandic triunfatcia, edo bere buruba ventzutcia. Bere buruba alaco moduan sujeto daucana, ce araguiyac arrazoyari; ta arrazoyac niri obeditcen dirala, onelacoa eguiyaz bere bu-

rubaren ventzutzallea, ta munduaren jabea da. Onetara allegatu nai baldin badezu, preciso da animo andiyarequin asitcia, ta asscora sustrayan ipintcia, atera, ta galdu dezazun zuganaco, ta mundu onetaco gauzaren batenganaco arrazoi gabeco aficioa. Vicio onetan, au da, personac bere burua bear ez dan bezala amatcean dago, sustrayetic ventzutu bear dan quasic guztiya. Vicio au ventzutu, ta sugetatu ezquero bada, bereala paque, ta sosegu andiya logratcen da. Baña cergatic guchic procuratcen duten beren burubentzat bear bezala iltcia, ta ez diran ere erantcitcen beren conveniencia, edo provechuren bat billatcetic, orregatic berengan nastuac gueldítcen dira, ta espirituan beren gañ ecin jaiqui dira. Nerequin animaco libertadearequin ibilli nai

duenac bada, mortificatu bear ditu bere aficio gaizto guztiyac, ta ez du aficioz criaturen batequin bat eguiñic egon bear.

## 54 CAPITULOA.

### *Naturalezaren, ta graciyaren muguimentu diferentien gañian.*

1. Cristau maitea, erreparazazu cuidadoarequin naturalezaren, ta graciyaren muguimentuctan, cergatic chit contrara, ta erraz ezagutcen ez diran moduan muguitcen dira, ta apenaz persona espiritualagandic, ta Jaungoicoagandic arguituagandic ezbada, bestegandic ezagutuac izaten diran: Malicia andicoa da naturaleza, ta asco bereganatcen ditu, nastutcen, ta lotcen ditu, engañatcen ditu, ta beti bere burubaren provechua

billatcen du. Baña graciya maliciaric gabea da, ta gaitzaren antzetic ere apartatcen da, ez du engañatcia billatcen, guztiya Jaungoicoagatic bacarric eguiten du, ta azquenian beragan descantsatcen da. Etzayo gustatcen naturalezari mortificatua, ta estutua izatia, ta besteren sujecioan egotia. Baña graciyac bere burubaren mortificacioan trabajatcen du, bere griña gaiztoai contra eguiten die, procuratcen du besteai sujeto egotia, deseatcen du ventzutua izatia, ta ez du gozatu nai bere libertadeaz. Aguintarien mendean egotia gustatcen zayo, ta ez du iñoren gañ egoteco deseoric, ezbadá beti Jaungoicoaren azpian vicitcia, egotia, ta izatia; ta prest dago munduco persona guztiyai Jaungoicoagatic sujetatcera. Naturalezaç, bere provechuagatic

trabajatcen du, ta bestegandic cer erabaci datorquion beguiratcen du; baña graciyac bere provechuagatic baño, besteenagatic gueyago beguiratcen du. Naturalezac honrac, ta alabanzac gustora errecibitcen ditu; baña graciyac Jaungoicoari honra guztiya leyal ezartcen dio. Naturalezac lotsac, ta desprecioac bildur ditu; baña graciya gozatcen da Jesusen icenagatic desprecioac sufritcen. Naturalezari alferqueriya, ta gorputzaren descantsua gustatcen zayo; baña graciya alferric ecin egon da, ta gustora nequea artcen du. Naturalezac gauza curiosoac, ta ederrac nai ditu, ta etzaizca gustatcen gauza despreciagarriyac, ta ordinarioac; baña graciya gauza curiosidade gabecoaquin, ta pobreaquin contentatcen da, ez du gauza latzatatic igues eguiten, ta

gustora jazten da erropa zarre-quin.

Naturalezac acabatuco diran gauzai beguiratcen die, erabaciagatic alegratcen da, ta galeragatic penatcen da, aserratcen da beraren contraco ecer ececo itz bategatic ere; baña graciyac betico gauzai beguiratcen die, ez du munduco gaucetan biotza ipinteen; galeragatic ez da penatcen; ez da ere aserratcen itz gogorracgatic, cergatic Ceruan, ecer galtcen ez dan lecuban bere tesoroa, ta consueloa ipintcen du. Naturaleza guticiosoa da, eman baño artu gustorago eguiten du, ta bere gauzac amatcen ditu; baña graciya urricatsua, ta guztiyentzacoa da, etzayo bere gauzaric gustatcen, guchirequin contentatcen da, ta zori obeagorotzat dauca ematia, artcia baño. Natura-

lezae criaturetara, gueren araguira, vanidade, ta ibillera alferretara tiratceen gaitu; baña graciyac Jaungoicoagana, ta virtutera eramaten gaitu, apartacen gaitu criaturetatic, igues eraguiten digu munduagandic, gorrotatcen ditu araguiyaren deseoac, mortificatcen du ibilli naya, ta publicoan aguertceeo lotsa ematen du, edo obeto esateco, lotsatcen da publicoan aguertcia. Naturalezac gustora artcen du sentiduetatic sartcen dan gustoren bat; baña graciyac Jaungoicoagan bacarric consolatu nai izaten du, ta mundu onetaco gauza guztiyen gañ ecin gueyagoco onean descantsatu.

Naturalezac bere erabaci, ta provechuagatic, gaitiya eguiten du, duaric batere ecin eguin du, ezbada edo beste aimbeste, edo gueyago, edo alabanza, edo mo-

sederen bat alcantzatcia, eguiten duen onagatic esperatcen du, ta eguiten duena, ta ematen duena besteac asco estimatcia deseo du; baña graciyac ez du munduco gauzaric batere billatcen, ezta ere Jaungoicoa beste sariric bere obracgatic, ez du ere deseatcen precisoac diran mundu onetaco gaucetatic, betico ondasunac alcantzatceco servidiozatequenac besteric. Naturaleza aide, ta adisquide asco izatez gozatcen da, gloriyateen da erri andicoa, ta fama, *edo* son andico gurasoena izatiaz, gustatcen zayo person andiyaquin tratatcia, aberatsen gustoa erraz eguiten du, ta alabatcen ditu bere antcecoac; baña graciyac etsayac ere amatcen ditu, ez da arrotcen adisquide asco duelaco, ez du ere casoric eguiten jayozan erria, ta gurasoac andiyac izatiaz, ez baldin

bada ayetan virtutea andiyagoa izan; gueyago favorecitcen du pobrea, aberatsa baño, gueyago erruquitcen da, inocentiaz, poderosoaz baño; eguiyatearequin gozatcen da, ez engañatearequin, ònac beti gauza obeagoac procuratceco, consejatcen ditu, ta Jaungoicoaren semeari virtutean iduritceco. Naturaleza gauzaren faltagatic laster quejatcen da; baña graciya ez, ezbada paciencian eramaten du. Naturalezac gauza guztiyac bereganonz biurtcen ditu, bere burubagatic peleatcen, ta arguimentuac eguiten ditu; baña graciyac Jaungoicoagana gauza guztiyac biurtcen ditu, beragandic etorrerera duten bezala; ez dio bere burubari batere gauz onic ezartcen, ez du ere soberbiarequin presumitcen; ez da leyatcen, ta ez du bere iritziya, bestiena baño

obeagotzaz juzgatcen, ezbada iritzi, ta ezaguera guztiyac betico jaquinduriyagana, ta Jaungoicoaren esamiñara sujetatcen ditu.

Naturalezac gauza ezcutúac jaquin, ta berriyac entzun nai ditu, campotic aguertu, ta sentiduetatic aseo gauza esperimentatu nai ditu, deseatcen du ezagutua izatia, ta alabanza eracarri diozaquen gauzaren bat eguitia; baña graciyac ez du procuratcen gauza berriyac, ta curiosoac jaquitia, cergatic au guztiya pecatu originaletic sortua da, bada ez da munduan gauza berriric, ta iraucorric. Graciyac eracusten du bada sentiduac mortificatcen, vanagloriya, ta soberbiatic igues eguiten, ta alabatcia mereci duten gauzac humildadearequin ezcutatcen, ta gauza guztiyetatic, ta jaquinduriya guztiyan animaco provechua, ta

Jaungoicoaren honra, ta alabanza billatcen. Ez du bera, ta bere gauzac alabatuac izatia nai, ezbada Jaungoicoa bedeicatua izatia eman diozcan doai guztiyetan deseo du, ceñàc, digun amorioagatie bacarric, ematen ditu gauza guztiyac. Gracia au Ceruco argui, ta Jaungoicoaren doai especial bat da, escogituen señalea, Ceruco gloriyaren, ta salvacioaren prenda, munduco gaucetatic Cerucoac amatcera persona jasotcen duena, ta araguizçoa izanic, espirituala eguiten duena. Cembat gueyago bada naturaleza mortificatcen, ta ventzutcen dan, ambat eta graciya gueyago animaratcen da, ta Ceruco visita berriyarequin persona espirituala Jaungoicoaren anteecoa gueyago ta gueyago eguinero eguiten da.

## 55 CAPITULOA.

### *Ceñ erraza dan naturaleza gauza gaiztoraco, ta graciyaren indarraren gañian.*

C. Zure antcera eguin ninduzun, nere Jaun, eta Jaungoicoa, indazu nere salvacioraco añ andiya, ta bearra dala eracutsi dirazun graci au, pecatuetara, ta betico galerara tiratcen naben nere naturaleza ventzutceco: sentitcen det nere gorputcian pecatuaren leguea, nere arrazoyaren legueari contra eguiten diona, ta araguiyari asco gaucetan obeditcera arrastatcen nabena, ta ecin aren griña gaiztoai contra eguin diezaquet, ez baldin badit laguntcen zure graciyac, nere biotcian jarri ta sututcen duela. Zure graciya, ta andiya alere bear da gaztetasunetic beti gaitcera macurtua dagoen naturaleza ventzutceco. Cergatic,

lembicirò guizon Adan zala motivo eroriya, ta pecatuagandic viciatua izanic, Adanen seme, ta alaba guztiyetara mancha onen pena jachi zan, aimbesteraño, ce zuc ondo, ta ona sortu cenuen naturaleza, vicio, ta naturaleza galduaren eritasunatzat juzgatcen da, cergatic aren muguimentuac berari utci ezquero, gauza gaiztora, ta lurrecoetara tiratcen du, cergatic gueldit u zan indar pisca, autsaren azpian dagoen chingarra arimbat da. Au illuntasun andiyarequin inguratua dagoen arrazoi naturala bera da, oraindic ona, ta gaitza, guezurra, ta eguiya ezagutu ditzaquena, ta diferentciatu ditzaquena, ona dala ezagutcen duen guztiya ecin eguin baduere, ta eguiyaren argui osoaz ta bere aficioen osasunaz gozatcen ezbadu ere.

Emendic sortcen da nere Jaungoicoa, arrazoyaren leguearen aldetic ni zure legueaz gustatcia, jaquiñic ona, justua ta santua dala zure mandamentua, deagar eguiten duela ere, igues eguin bear dala vicio, ta pecatu guztiyetatic. Baña, gorputcez pecatuaren leguеari servitcen diot, arrazoyari baño sentiduai obeditu nayago deranian. Emendic dator deseo ona baderala, baña ez derala cumplitcen. Orregatic ascotan gauz ònac eguiteco asmoa artcen det, baña nere argaltasuna motivo, nere naturalezac pisca bat contra eguitia asco izaten da, animoa galtceco, ta artu nuen asmo santua ez cumplitceco. Emendic dator ere, çe perfeccioco videa ezagutcen badet ere, ta nola eguin bear deran nai arimbat icusten badet ere, onaraco argaltasunaren po-

derioz perfeccioco gaucetara jaiqui gabe gueldilcen naizala. ¡O ceñ bearra deran, Jauna, zure graciya gauza ona asitceco, seguitceco, ta acabatceco! Cergatic ori gabe ecin det ecer, ta orrequin gūztiya dezaquet. O eguiyaz cerutarra ceran graciya, ceña gabe ecer ez dira personaren merecimentuac, ez dira ere batere estimatcecoac naturalezaren doayac. Ez dute, Jauna, zure graciya gabe ecer valio zure beguiyetan habilidadeac, ondasunac, edertasunac, indarràc, ingenio, edo ita eguiteco habilidadeac: cergatic naturalezaren doayac nola justuenac, ala gaiztoenac dira, baña graciya, ta zure amorioa zure escogituen doai propioa da, ceñarequin señalaturic daudela, mereci dute Ceruco gloriya. Añ gauza andiya da graci au, ce au gabe ez pro-

fetatceco, edo guertatu baño leonago gauzac ezagutceco doayac, ez milagroac eguiteac, ta ez dan gauzaric andiyenac ecer valio ez du. Esta fedea, esperanza, ta beste virtutear ere graciya, edo zure amorio gabe ez dituzu estimatcen.

¡O guztiz zori oneco graciya espirituz pobrea, virtutez aberazten dezuna, ta ondasun ascoz aberatsa dana biotzaz humilla eguiten dezuna! Atoz, jachi zaitez nigana, bete nazazu laster zure consueloz, biotceco neque, ta legortasunaren poderioz nere anima il ez dedin. Entzun nazazu arren, Jauna, escari onetan, betor nigana zure graciya, cergatic ori izan ezquero, ez det naturalezac escatcen duenaren bearric. Tentatua, ta neque ascorequin penatua izanagatic, zure graciya nerequin izan ezquero, ez det gaitcen bildurrio

izango. Bera da nere indarra, berac consejua, ta laguntza ematen du. Etsai guztiyac baño indar gueyago du, jaquintsun guztiyac baño jaquintsuagoa da. Cergatic eguiyaren maisua da, Jaungoicoaren leguearen eracustzallea, biotceco, edo animaco arguiya, estutasuneco consueloa, tristurari igues eraguiten diona, bildurraren quendutzallea, devocioaren irauntzallea, negarren sortzallea. ¿Cer naiz ura gabe, ezbada egur igarra, ta landare ecertaco eza? Zure graciya bada, Jauna, beti nere aurretic izan dedilla, jarrai dizadala, ta obra onetan beti emplearaci nazala gure Jesusen merecimentuacgatic. Amen.

## 56 CAPITULOA.

*Gure buruba ucatu, ta gurutcea mediante Jesusi jarraitu bear diogula.*

J. Cristau maitea, cembat zure personatic irteten ceran, aimbeste igaroco cera nigana. Nola campotic ecer ez deseatciac barrengo paquea ematen duen, àla barrendic bere burubari utcitciac, Jaungoicoarequin bat eguiten du. Nic deseatcen deran gauza da, icastea zuc zure burubaren ucatce perfectoa nere vorondatean, batere contra eguin gabe, ta quejaric gabe. Jarrai zadazu, ni naiz videa, eguiya, ta vicitza. Vide gabe ez da joaten, eguiya gabe ez da ezagutcen, ta vicitza gabe ez da vicitcen. Ni naiz zuc jarraitu bear dezun videa, sinistu bear dezun eguiya, ta esperatu bear dezun

vicitza. Ni naiz ecin uts eguin ditequien videa, ecin falta dezaquien eguiya, ta acabatuco ez dan vicitza. Ni naiz vide guztiz zucena, ecin gueyagoco eguia, vicitza eguiyazcoa zori onecoa, ta eternidadetic dan vicitza. Nere videan irauten badezu, eguiya ezagutuco dezu, berac libratuco zaitu, ta betico vicitza icasico dezu. *Vicitzara sartu nai baldin badezu, guardatcitzu mandamentuac.* Eguiya ezagutu nai baldin badezu, niri siniszadazu. *Perfectoa izan nai baldin badezu, saldutcitzu guztiyac.* Nere discipuloa izan nai badezu, *zure buruba ucazazu.* Zori oneco vicitza izan nai badezu, mundu onetaco vicitza despreciazazu. Ceruan honratua izan nai badezu, humil zaitez munduan. Nerequin erreinatu nai badezu, gurutcea nerequin eramazu, cergatic gu-

rutcearen servitzariyac bacarric, topatcen dute zori onaren, ta eguiyazco arguiyaren videa. *C.* Jesus nerea, cergatic estua dan zure vicitza, ta munduagandic despreciatua, indazu, munduaren desprecioarequin zuri jarraitceco graciya. *Cergatic, ez da servitzariya bere nagusiya baño andiyagoa, ezta ere discipuloa, bere maisua baño.* Egercita bedi zure servitzariya zure vicitzan, cergatic an dago nere osasuna, ta eguiyazco santidadea. Artzaz campora iracurtcen, edo entzuten dituran gauzatatic batec ere ez nau alegratcen, ta osotoro consolatcen. *J.* Cristau maitea, cergatic gauz abec daquizquitzun, ta guztiyac iracurri dituzun, zori onecoa izango cera, eguiten badituzu. *Nere mandamentuac dituena, ta guardatcen dituena, bera da ni amatcen*

*nabena*, amatuco det nic ere bera aguertuco natzayo berari, ta nerequin batean eserieracico det nere aitaren erreinoan. *C.* Jesus nerea, esan dezun, ta aguindu edo prometitu dezun bezala cumpli dedilla, ta niri guerta daquidala. Artu det, artu det zure escutic gurutcea, eramango det ipiñi dirazun bezala. Asiya dago, atcera joatia ez da libre, ta utcitcia ere ezda conveni. Ea cristau maitea, goacen alcarrequin, Jesus izango da gurequin, iraun dezagun Jesusen amorioz gurutcean. Gure laguntzallea izaugo da, gure Capitana, ta gure aurretic joan zana da. Orra; gure Erreguea gure aurretic dijoa, ta berac gugatic peleatuco du; jarrai diozagun animo andiyarequin, ez dezala iñorc bildurric izan, egon gaitecen animo andiyarequin guerran ilteco

prest, ta ez dezagula gure honra manchatu, gurutceagandic igues eguiñaz.

## 57 CAPITULOA.

*Ez duela cristaubac, faltaren batzuetan eroriagatic, animoa galdu bear.*

J. Cristau maitea, gueyago gustatcen zait niri trabajuetan paciencia, ta humildadea izatia, trabajuric ez danian consueloa, ta devocioa baño. ¿Cergatic penatcen zaitu zugatic esan dan gauza chiqui, edo ecer ez batec? Gueyago izanagatic ere etciñan muguitu bear. Baña oraiñ, utcizazu igarotcen, ezta lembicicoa, ezta ere berriya, ta ezda ere azquenecoa izango, luzaro vici baldin bacera. Animosoa cera zure contraco gauzaric guertatcen etzai-

tzunian; oudo ere consejatcen dezu, ta besteac zure itzaquin animatu izan dituzu; baña bat bateco trabajuren bat zure ateetara datorquizunian, falta zaitzu consejua, ta animoa. Beguirazazu, ecerez querietan ascotan esperimentatcen dezun zure argaltasuna, ceñ andiya dan: baña orregatic ere zure onagatic izaten da gauz abec, ta aben antcecoac guertatcen diranian. Quenzazu pena ori zure biotcetic aldezun ondoena; ta icutu bazaitu ere, ez dizazula animoa guztiro galdu, ta luzaro nastuta lotua iruqui; ecin badezu gustora, paciencian badere eramazu. Eta entzuten badezu ere gusto guchirequin gauzaren bat, ta enfaduren bat sentitcen badezu, mortificazazu zure sentimentua, ta ez dedilla bear ez dan gauzaric, edo iñor escandalizatcecoric zure

abotic irten. Laster sosegatuco da zure biotza, ta barrengo miña, graciya datorrenian, gozatuco da. Yici naiz oraindic, zuri laguntceco, ta prest nago, costumbratcen deran baño ere gueyago zu consolatceco, nigan confiatcen, ta devocioarequin deitcen badirazu. Sendo zaudé, ta presta zaitez, gueyago sufritceco. Ez dago guztiya galdua, penatua, ta tentatua zure buruba ascotan icusiagatic. Guizona cera, ta ez Jaungoicoa, araguiya, ta ez Ainguerua. ¿Nola egon al zaitezque beti virtuteco estadu batian, Ceruan bertan Ainguerua, ta Adanec paradisoan ala iraun ez bazuten? Ni naiz negarrez daudenai consuelo betea ematen dieranac, ta beren miseriya ezagutcen dutenac, nere jaungoicotasunera ecartcen ditut. *C.* Bedeicatua izan dedilla, Jauna, zure

icen santua, heretzat ezti guztiyac baño gozoagoa. ¿Cer eguingo nuque aimbeste penetan zuc zure itzaquin consolatuco ez banindu-zuque? Eta azquenic salvatcera allegatcen baldin banaiz, ¿cer importa du jaquiteac, cer ta cer gauza andiyac padecitu dituran? Indazu azquen ona, indazu mundu onetatic besteraco irtcera zori onecoa. Acorda zaitez arren, Jauna, nitzaz, ta eramanazazu chussen chussen zure erreinora. Amen.

## 58 CAPITULOA.

*Gure ezagueraz gañeco gauzac, ta Jaungoicoaren juicio ezcutuac ez dirala esaminatu bear.*

J. Cristau maitea, guarda zaitez zure ezagueraz gañ diran gaucen, ta Jaungoicoaren juicio ezcu-

tuen gañian disputaciaz: ¿Cergatic au onela utcitcen da, ta bestea graciya andiyagora artcen da? ¿Cergatic oni aimbeste pena ematen zayo, ta besteari aimbeste honra? Gauz abec, cristau maitea, guizonen ezagueraz gañ dira, ta ez du valio ez arrazoyac, ta ez disputac Jaungoicoaren juicioac ezagutceco. Onelaco gauzac bada etsayac burura ecartcen dizquitzunian, edo persona curiosoren batec galdetcen dizquitzunian, erantzun zayozu Profeta Santuac esaten zuen au: *Justua cera, Jauna, ta zucena da zure juicioa.* Edo beste au: *Jaunaren juicioac eguiyazcoac dira, ta berengan justificatuac.* Nere juicioac bildur izatecoac dira, ta ez esaminatcen erabiltcecoac, cergatic personaren ezagueraz gañ dira. Ez dezazula ere galdetu, ta disputatu Santuen

merecimentuen gañian, ceñ dan bestea baño Santuagoa, edo Ceruco erreinoan andiyagoa. Onelaco gauzac ascotan ecer servitcen ez dute, ezda baidac sortcen dituzte, ematen diote ere gaya soberbiari, ta vanagloriyari, nondic sortcen diran invidiyac, ezda baidac, batac Santu ura, ta besteac beste Santua andiyagoa dala soberbiarequin leyatcen diranian, ta empeñatcen diranian. Baña onelaco gauzac jaquitiac, ta esaminatciac ez dacar batere provechuric, ezbada Santuai naigabea ematen diote, cergatic ez naiz ni ezda baidaren Jaungoicoa, ezbada paquearena, ceña gueyago dago eguiyazco humildadian, bere burubaren alabanzan baño. Asco amorioaren celoz inclinatcen dira Santu batzuetara, besteetara baño gueyago, baña guizonezco afec-

toarequin, ez Jaungoicozcoarequin. Ni naiz Santu guztiyac eguin nituena, nic eman nien graciya, ta gloriya. Nic ezagutcen ditut guztiyen merecimentuac, nic *alde* aurretic nere graciyaren bendicioaquin prestatu nitueu. Nic ezagutu nituen eternidadetic nere adisquideac; nic autu nituen mundutic, ez bérac ni. Nic deitu nien nere graciya mediante, ta neregánatu nituen misericordia mediante. Nic eraman nituen tentacio modu ascotatic. Nic eman nizten consuelo zoragarriyac, ta iraupena, ta coroatu nuen ayen paciencia. Nic lembicicoa, ta azquenecoa ezagutcen ditut: nic guztiyai laztan amaten diet ecin pondera ditequien amorioarequin. Nic izan bear det alabatua nere Santu guztiyetan, ta guztiyen gañ bedeicatua, ta honratua ayetaco ba-

coitcian, ceñac beren merecimentuic batere izan baño lenago, aimbeste honratu, ta neretzat autunituen.

Nere Santuric dan chiquiena ere despreciatcen duenac bada ez du andiya ere honratcen, cergatic chiquiya, ta andiya nic eguin nituen. Eta Santuren bati bere santutasunetic cerbait quentcen dionac, quentcen dit ere niri, ta beste Santuai Ceruco Erreinoan. Guztiyac bat dira amorioa mediante, iritzi, ta vorondate bat dute; ta guztiyac batere faltatu gabe amatcen dira. Ta oraindic gueyago dana: beren burubac, ta beren merecimentuac baño gueyago amatcen naute ni; cergatic beren burubaz, ta beren amorioaz azturi, nere amorioan guztiyac empleacen dira; ceñian gozotoro descansatcen dira. Ezda ayec aparta di-

itzaquien gauzaric, cergatic betico eguiyaz beteric, ecin itzali ditequien amorioaren subarequin erretcen dira. Issill bitez bada guizon araguizcoac Santu onen, *edo* bestearen santutasuna andiyagoa dan disputatcetic, cergatic ezdaquite beren gustocoac ezbada besteric amatcen. Beren inclinacioa nola dan, ala quenteen diote, edo gueitcen diote Santuen santutasunari, ta ez betico eguiyari guztatzen zayon bezala. Onen motivoa asco personetan, ignorancia da, ta batez ere Jaungoicoagandic espirituco argui guchi errecibitu dutenetan, ceñac guchitan iñor amorio espiritual perfectoarequin amatcen dute. Asco oraindic beren aficio utsaz, ta guizonezco adizquidetasunaz abetara, edo besteetara inclinatcen dira, ta munduco gaucetan bezala Cerucoetan ere

pensatcen dute, baña ecin pondera ditequien diferencia dago espiritualac ez diran pensamentuetan, ta Jaungoicoac arguituric, persona espiritualac izaten dituztenetan.

Guarda zaitez bada, christau maitea, zure jaquinduriyaz gañ diran gauz abec examinatcen ibiltcetic, ezbada procurazazu, dan chiquiyena badere Ceruco erreinoan zu izatia. Eta norbaitec jaquingo baluque ere, ceñ Santu dan andiagoa, edo ceñec duen gloriya gueyago, ¿cer valioco lioque ori jaquitiac, ez balitzaque onetatic nere aurrian gueyago humilduco, ta ni gueyago alabatcera muguituco? Gusto gueyago ematen dio Jaungoicoari bere pecatuen anditasunaren, ta bere virtutien chiquitasunaren gañian pensatcen duenac, Santuen andiyagotasun, edo chiquiyagotasunaren gañian

disputatcen duenac baño. Obeago da Santuai oracio devoto, ta negarraquin erregutcia, ta ayen laguntza biotz humillarequin escatcia, ayen gauza ezcutuac examinatcen ibiltcia baño. Ayec ondo, ta guztiz contentu alere daude, baldin balequiteque guizonac contentu egoten, ta beren disputa alferrac utcitcen. Ez dira gloriyatcen beren merecimentuacgatic, cergatic ezdiote beren burubari gauz oñic ezartcen, ez bada niri, cergatic neurri gabeco amorioz gauz on guztiyac nic eman nizten. Jaungoicotasunaren amorioz, ta consueloz aiñ beteac daude, ce etzaye gloriaric falta, ta ecin zori onetic ere ecer falta lieque. Santu guztiyac, cembat andiyagoac gloriyan; ambat humillagoac berengan, ta nere alderagoac, ta amatuagoac dira; ta orregatic daucam

escribitua. *Botatcen cituzten beren coroac Jaungoicoaren aurrean, ta adoratuzuten beti vici dana.* Ascoc galdetcen dute, ceñ dan andiyena Ceruco erreinoan, berac ezdaquitelaric, chiquiyenaquin ere egotia, mereci izango duten. Gauza andiya da, dan chiquiyena ere Ceruco gloriyan izatia, ceñian guztiyac dira andiyac, cergatic guztiyai deituco zaye Jaungoicoaren semeac, ta ala izango dira. Chiquiyena vicico da millaren artian, ta pecatari Jaungoicoaren bildur gabecoac betico eriotza edo infernua izango du. Galdetu zutenian bada Discipuloac; ceñ izango zan andiyena Ceruco erreinoan? Erantzun cien Jesusec: *Ez baldin bacerate aur biurtcen, ta aurchoac bezala eguiten, etcerate sartuco Ceruco Erreinoan.* Aurcho au bezala bada humillatcen dana, izango da

andiyena Ceruco Erreinoan. ¡Ai aurchoac bezala gustora humiltcen ez diranaz! Cergatic Ceruco Erreinoco ate humillac ez die sartcen utcico. ¡Ai aberatsaz ere emen beren consueloac dituztenaz! Cergatic pobreac Ceruco Erreinoan sartcen dirala, berac campoan negarrez egongo dira. Gozazaitezte humillac, ta alegrazaitezte pobreac, cergatic zuena da Jaungoicoaren Erreinoa, beraren mandamentuac cumplitcen dituzutela.

## 59 CAPITULOA.

*Esperanza, ta confianza guztiya Jaungoicoagan bacarric ipiñi beardala.*

*C.* Jauna cerda mundu onetan nic deran confianza? ¿Edo cer nere consueloric andiyena munduan agueri diran gauza guztiyetan?

Etcera zu venturaz, nere Jaun, eta Jaungoicoa, misericordiyetan neurriric gabea? ¿Non joan citzadan ondo zu gabe? ¿Edo noiz gaizqui joan altcitzadacan zu nerequin ciñala? Nayago det zugatic pobrea izan, zu gabe aberatsa baño. Nayago det zurequin vici, Ceruan zu gabe baño. Zu non ceran, an da Cerua ere, ta etzauden lecuan, an eriotza, ta infernua. Zu cera nere deseoa, ta orregatic zure billa negar, deagar, ta oracioa eguin bear det. Zugan ez bada bestegan ecin osotoro nere premiyetan confia dezaquet. Zu cera nere esperanza, ta confianza, zu nere consolatzallea, ta guztiyetan leyalena. Guztiyac beren gauzac billatzen dituzte baña zuc nere animaco osasuna, ta aurreratcea bacarric billatcen dezu, ta gauza guztiyac onean biurtcen dizquidatzu. Tentacio,

ta pena ascotan ipintcen banazu ere, guztiya nere provechuraco eguiten dezu, zure adisquideac milla modutara probatcia costumbratu izan dezuna, ceñean ez dezu guchiyago amatua, ta alabatua izan bear, Ceruco consueloz beteco baldin baninduzuque baño. Zugan bada nere Jaun, eta Jaungoicoa, ipintcen det nere esperanza, ta consuelo guztiya, baita ere zure escubetan nere neque ta pena guztiya, cergatic zutzaz campora icusten deran guztiya aldacorra, ta eriya da.

Ez dute bada ecer valioco adisquide ascoc, ezta ere laguntzalle indartsuac, ezta ere valio dezaquien consejuric eman consejero jaquintsuac, ezta ere consolatu jaquintsuen librubac, ezta ere gauza estimagarriren batec libratu, ezta ere ez lecu issillac, ta ez

alegreac defenditu, ez baldin banazu cedorrec asistitcen, laguntcen, animatcen, consolatcen, eracusten, ta defenditcen. Cergatic paquea, ta zori ona izateco dirala diruriten gauza guztiyac, zu gabe ecer ez dira, ta ez dute eguiyaz zori onic ematen. On guztiyen azquena bada, vicitzaren goya, ta itcen anditasuna zu cera, ta guztiyen gañ zugan esperatcia zure servitzarien consuelo sendoa. Zugana daude nere beguiyac, zugan esperatcen det, misericordien aita nerea. Bedeicatu, ta santificazazu nere anima Ceruco bendicioarequin, zure vici lecu santua, ta betico gloriyaco eser lecuba eguin dedin, ta zure beguiyai gustatcen etzayen gauzaric nigan topatu ez dedin. Beguira zadazu arren zure ontasun, ta misericordien anditasunaz bat, ta entzunzazu zure

servitzari pobre negarrezco valle onetan desterratuaren negarra, ta oracioa. Defendizazu, ta guardazazu zure servitzarichoaren anima vicitza negargarri onetaco aimbeste peligroetan, ta zure graciya lagun duela, eramazu paqueco videtic betico arguiyaren errira. Amen.



VICI BEDI JESUS.

# JESUSEN IMITACIOCO,

## LAUGARREN LIBRUBA,

### Aldareco Sacramentuaren gañian.

### *Jesusec comuniora eguiten duen deya.*

*Atozte nigana neque, ta trabajuaquin penatuac, ta cargatuac zaudezten guztiyac, ta nic consolatuco zaituztet,* dio Jaunac. *Nic emango deran oguiya, nere gorputza da munduaren vicitzagatic. Artuzazute, ta janzazute, au da nere gorputza, zuecgatic entregatua izango dana. Eguizute au*

*nere oroipenian, edo acordoan. Nere gorputza jaten, ta nere odola eraten duena, nigan guelditcen da, ta ni argan. Nic esan dizquitzuteran itzac, espiritua, ta vicitza dira.*

## 1 CAPITULOA.

### *Erreverencia ceñ andiyarequin Jesus errecibitu bear dan.*

C. Zureac dira, nere Jesus maitea, ta betico eguiya cerana, orain esan diran itzac, guztiyac dembora batian esanac ta lecu batian escribituac ez baldin badira ere. Cergatic bada zureac, ta beragatic eguiyazcoac diran, gustora, ta leyal guztiyac artu bear ditut. Zureac dira, ta zuc esan cenituen, nereac dira, cergatic nigatic esan cenituen, nere onagatic, Jauna. Gustora artcen ditut zure abotic, nere biotcian gogoticago

sartu ditecen. Muguitcen naute ontasun añ andico, amorioz, ta gozotasunez betericaco itzac, baña icaratcen naute nere pecatuac, ta atceratcen nau nere conciencia ciquiñac misterio añ andiya errecibitcetic. Muguitcen nau zure itcen gozotasunac, baña nere vicioen cargac ez dit zugana etortcen utcitcen. Aguintcen dirazu, allega nadilla zugana confianzarequin, zurequin parte izan nai baldin badet, ta animan il gabe vicitceco janariya, artu dezadala, betico vicitza, ta gloriya alcantzatu nai baldin badet. Atozte nigana diozu, nequearequin, ta cargarequin zaudezten guztiyac, ta nic alibiatu, ta consolatuco zaituztet. ¡O ceñ atseguiña, ta maitagarriya dan itz ori pecatarien belarrietan! ¿Zuc, nere Jaun eta Jaungoïcoa, pecatari pobre,

ta miserablea zure gorputz santuaren comuniora deitcen dezula? Baña ¿nor naiz ni Jauna, zugana allegatcera atrebitceco? Icusten det Ceru guztiyetan cabitcen etcerala; ta orregatic ere zuc esaten dirazu niri; Atozte nigana guztiyac? ¿Cer esan nai du guztizco misericordia onec, ta convite añ maitagarriyac? ¿Nola atrebituco naiz etortcera, ez baldin badet icusten nigan, orretara atrebitceco gauz onic? ¿Nola sartuco zaitut nere echean, zure arpegui guztiz maitagarriya aimbeste ofenditu deralaric? Aingueru, ta Arcangeluac icara eguiten dute, Santuac, ta justuac bildurtcen dira, ta zuc esaten dirazu: Atozte nigana guztiyac? Ez baldin bacenuque zuc au esango, ¿norc sinistuco luque, Jauna, eguiya dala? Eta zuc aguinduco ez bacenuque,

¿nor allegatcera atrebitucó litzaque?

Noé guizon justuac eun urtian trabajatu zuen cucha eguiten, persona guchi batzuequin ito gabe guelditceco mundu guztiya galdu zuen ugaldean, ¿ta nola ni ordu batian presta naiteque, munduaren eguillea erreverenciarequin errecibitceco? Moises zure servitzari, ta adisquide audiac eguin zuen usteltceu ez dan olezco cucha bat, eta urre guztiz garbiyarequin doratu zuen, legue santaco olac an ipintceco, ¿eta ni criatura usatel au atrebituco naiz zu, legueacren eguintzallea, ta vicitzaren emantzallea, añ erraz errecibitcera? Salomonec, Israelgo Erreguerie jaquintsuenac zazpi urtean eguin zuen zure icenaren alabanzan Eliz guztiz ederra, ta zortci egunian celebratu zuen aren con-

sagracioco festa, milla ofrenda ofrecitu cituen, ta Testamentu santuco cucha musica, ta alegriya andiyarequin ipiñi zuen, arentzat prestatua cegoen lecuban: eta nic errucarri, ta guztiyetan ecer ecen onec ¿nola nere echean sartuco zaitut, ordu erdi bat ere doy doya devocioarequin igarotcen baldin badaquit? Ta ojala beñ badere ondo ordu erdi bat aldean. ¡O nere Jaungoico ona, cembat procuratu zuten ayec eguitia zuri gusto ematiagatic! ¡Ay ceñ guchi dan nic eguiten derana! ¡Ceñ dembora guchi eguiten deran, comulgatceco prestatcen naizanian! Guchitan guztiya nigan bildua, ta guchiyagotan distraccio, edo buruco diversio guztiyetatic garbitua. Eta ez luque eguiyaz zure jaungoicotasunaren zori oneco presencian gauza gaiztoric bu-

rura etorri bear, ez nuque ere munduco gaucetan pensatcen egoń bear, cergatic, ez Ainguerua, ezbada Ainguerruen Jabea nere echean errecibitu bear det.

Diferencia andiya dago orregatic ere Testamentuco cucharen bere reliquiaquin batean, ta zure gorputz guztiz garbi, ecin esan ditezquien bezalaco virtutez betearen artian ; Juduen sacrificio, guerocoen ichurac ciranen, eta zure gorputzaren eguiyazco hostian, lenagoco sacrificio guztiyen osagarriyan. ¿Nola bada ez naiz gueyago irazaquitcen zure vista beneragarriyan? Antciñaco Santu, Patriarcac, Profetac, Erregueac, ta Principeac erri guztiyarequin batian devocio añ̃ andiya aditcera eman bazuten beren ofrenda, ta sacrificioetan, ¿cergatic ez naiz ni cuidado gueyagorequin prestatcen,

zu Sacramentuan errecibitceco? David Erregue guztiz devotoac, Jaungoicoac bere guraso antciñacoai egiñicaco mesedeac gogoratcen cituela, dantzatu zuen eguiñala guztiyan Jaungoicoaren cucharen aurrian; eguiñ cituen modu ascotaco organo edo musicaco instrumentuac, atera cituen psalmo, edo cantac, aguindu zuen alegriyarequin cantatceco, berac ere ascotan cantatu zuen guitarra, edo arparequin: Espiritu Santuaren graciyaz muguituric, eracutsi cion Israelgo gendeari, Jaungoicoa biotz guztiyarequin alabatcen, ta canta ederraquin egunero bedeincatcen, ta honratcen. Orain bada devocio añ andiya orduan baldin bazan, ta Testamentuco cucharen aurrian Jaungoicoa ainbeste alabatua izan baldin bazan, ¿ cer reverencia, ta devocioa izan

bear ezdegu nic ta gañeraco cristau guztiyac Sacramentu santuaren aurrean, Jesusen gorputz ecin gueyagoraño estimagarriya errecibitcen degunian? Asco joaten dira lecu ascotara Santuen reliquiyac vicitatcera, ta arritcen dira ayen obrac entzunic; icusten dituzte Eliz andiyac, ta sedaz, ta urrez bilduric dauden ayen ezur santuai muñ eguiten diete, ta orra, emen zaude presente aldarian zu, nere Jaun, eta Jaungoicoa, Santu guztiyen Santua, guztiyen Creadorea, ta Ainguerüen Jauna. Esan dituran gauzac icustean, ez da izaten ascotan curiosidadea, ta lenago icusi etciran gaucen icusi naya besteric, ta emiendaco frutu guchi ateratcen da, batez ere pecatuen damu gabe batatic bestera ibiltcen danian; baña emen aldareco Sacramentu Santuan presente

zaude nere Jaungoico guztiya, Jesu Cristo Jaungoico, ta guizon eguiyazcoa, ceñian salvacioco frutu andiya errecibitcen da, bear bezala, ta devocioarequin errecibitua ceranian; baña ez du onetara ecartcen arinqueriya, edo curiosidaderen batec, ezbada fede firmeac edo señdoac, esperanza devotoac, ta eguiyazco amorioac.

¡O eciñ icusi zaitezquien Jaungoicoa, munduaren eguillea, ceñ modu miragarriyan gurequin portatcen ceran! Ceñ modu atseguin, ta gozoan zure escogituaz dispontcen dezun, ceñai cerori aldareco Sacramentuan errecibitceco ematen cera. Adimentu guztiyen gañ da bada au; oñec batez ere devotoen biotzac bereganatcen ditu, ta irazaquitcen du amorioa: bada zure eguiyazco cristaubac bérac beren vicitza guztiya emiendaraco

dispontcen dutenac, devocioco graciya andiya, ta virtutearen amorioa ascotan errecibitcen dute Sacramentu onetatic. O Sacramentuaren graciya miragarri, ta estaliya, ceña, Jesusen fedea dutenac bacarric ezagutcen dute, baña federic ez dutenac, ta pecatuai servitcen dietenac ecin esperimentatu dezateque. Sacramentu onetan ematen da graciya espirituala, animaratcen da galdu zan virtutea, ta pecatuarequin galdu zan edertasuna biurtcen da. Aimbestecoa da ascotan graci au, ce errecibitcen dan devocioaren poderioz ez bacarric anima, ezbada gorputz argala ere indarturic sentitcen da. Orregatic ere, gauza negargarri, ta errucarriya da gu añ epelac, ta naguiyac izatia, Jesus errecibitceco, ceñian dago salvatuco diranen esperanza, ta merecimentu

guztiya; cergatic bera da gure santutasuna, ta erredencioa, bera gure consueloa, ta Santuen betico gloriya. Gauza guztiz negargarriya da bada, ascoc misterio provechugarri au aiñ guchi consideratcia, ceñac alegratcen du Cerua, ta mundu guztiya conservatcen du. ¡O Adanen semeen biotzaren ichutasun, ta gogortasuna, doai aiñ eciñ ponderagarriya ez gueyago erreparatcia, ta allegatcia ere, maiz errecibitcetic, artan batere ez erreparatcera! Cergatic, baldin Sacramentu au eguiten dan meza, lecu batian bacarric, ta Sacerdote bategandic bacarric mundu guztiyan esango balitzaque, ¿Cembateco deseoarequin uste dezu lecu artara, ta Jaungoicoaren Sacerdote argana gendea meza entzutera joango litzaquela? Baña orain Sacerdote asco dira, ta lecu

ascotan ofrecitcen da Jesus, cembat eta zabalduagoa dagoen munduan comunio santua, ambat eta andiyagoa, aguer dedin graciya, ta Jaungoicoaren guganaco amorioa. Esquerrac zuri, Jesus ona, betico artzaya, cergatic gu miserable, ta esquer gaiztoco oc zure gorputz, ta odol valiosoarequin mantendu nai izan gaituzun, eta abec errecibitcera ere zure aboz convidatu nai izan gaituzun, esanaz: *Atozte nigana necatuac, ta cargatuac zaudeztenac, ta nic aliviatu, ta consolatuco zaituztet.*

## 2 CAPITULOA.

*Jaungoicoaren ontasun, ta amorio andiya ematen zaigula aditcera aldareco Sacramentuan.*

C. Zure ontasun, ta misericordia andiyan confiaturic, Jauna, alle-

gatcen naiz eriya Salvadoreagana; goseac, ta egarriyac nagoana vicitzaren iturrira; pobrea Ceruco Erreguegana; servitzariya Jaunagana; criatura Creadoreagana; penaz betea nere consolatzalle urricaltsuagana. ¿Baña nondic nora merecitu det nic zu nigana etortcia? ¿Nor naiz ni, cerori niri emateco? ¿Nola atrebitcen da pecatariya zure aurrian aguertcera? ¿Eta nola humiltcen cera zu pecatariagana etortcera? Ezagutcen dezu zuc zure servitzariya, ta ondo daquizu, ez duela gauz onic, zuc berari mesede au eguiteco. Aitortcen det bada, Jauna, nere ecer eza, ezagutcen det zure ontasuna, alabatcen det zure misericordia, ta ematen dizquitzut esquerrac zure gueyeguico amorioagatic. Cedorrengatic bada au eguiten dezu, ta ez nere merecimentuaç-

gatic, zure ontasuna gueyago ezagudezadan, amorioa gueitu dequidan, ta humildadea honratua izan dedin. Cergatic bada zuri gustatcen zaitzun au, ta ala eguiteco aguindu cenuen, gustatcen zait zure vorondate ona, ta ojala nere pecatuac eragotcico ez baluque. ¡O Jesus guztiz gozo, ta urricaltsua! ¡Cembateco erreverencia, esquerrac, ta betico alabanzac zor zaizquitzun, zure gorputz sagradua errecibitceco, ematen dezulaco, ceñaren anditasuna ecin iñorc pondera dezaque!

Baña ¿cer pensatuco det comunio onetan nere Jaunagana allegatceco demboran, ceña bear bezala ecin erreverenciatu dezaquet, ta orregatic ere devocioarequin errecibitu deseo det? ¿Cer gauza obeago, ta provechugarriyagoric pensa dezaquet, Jauna, ezbada

berau zure aurrian guztiro humiltcia, ta zure neurri gabeco ontasuna nere aleguin guztiyan alabatcia, ta bedeicatcia? Alabatcen zaitut, nere Jaun, eta Jaungoîcoa, ta alchatcen zaitut eciñ gueyagoraño. Despreciatcen naiz, ta sujetatcen naiz zuri nere ecer ezaren beeraño. Orra: Jauna zu Santu guztiyen Santua, ta ni pecatuen ciquinqueriya. Orra: zu jachitcen cera nigana, cergatic nic zuri beguiratcia ere mereci ez det. Orra: zuc nigana etorri nai dezu, nerequin egon nai dezu zuc, zure convitera deitcen nazu zuc. Zuc niri Ceruco janariya, ta Aingueruen oguiya jateco eman nai dirazu, ez eguiyaz besteric, ezbada zerori, ogui vicia Cerutic jachi ciñana, ta munduari vicitza ematen diozuna. Orra nondic sortcen dan amorioa, orra cer misericordi

andiya arguitu zan. ¡O cer esquerrac, ta alabanza andiyac abecgatic zor zaizquitzun! ¡O ceñ ona ta provechugarriya zure pensamentua Sacramentu au eguitean! ¡O ceñ atseguiña, ta gustosoa dan convite au, ceñian cerori janaritzat eman ciñan! ¡O ceñ miragarriya dan, Jauna, zure eguitea, ceñ poderosoa zure virtutea, ta ceñ eciñ esan ditequena zure eguiya! Cergatic, esan cenuen, ta eguiñ ciran gauza guztiyac, ta au ere eguin zan, ceña cedorrec aguindu cenuen. Gauza miragarriya eguiyaz, ta sinismena mereci duena, ta guizonaren adimentuz gañ dana, zu nere Jaun, eta Jaungoicoa, Jaungoico, ta guizon eguiyazcoa oguiyaren, ta ardoaren antz chiqui baten azpian zu oso osoa egotia, ta acabatu gabe ecer eztu gabe artcen zai-

tuztenengandic jana izatia!

Zuc, guztiyon Jabea, iñoren bearric ez dezuna, gurequin vici nai izan cenuena zure Sacramentua zala medio, guardatcitzu nere anima, ta gorputza garbiric, conciencia alegre, ta garbiyarequin zure misterioac maiz celebratu ditzadan, eta nere betico oneraco errecibitu ditzadan, ceñac batez ere zure honraraco, ta betico oroipenaraco eguin cenituen. Alegra zaitez nere anima, ta emayozcatzu esquerrac zure Jaungoicoari negarrezo valle onetan utci cizun doai aiñ noble, consolagarri, ta zoragarriyagatic. Cergatic, cembat bider misterio au erreverentciatcen dezun, ta Jesusen gorputza errecibitcen dezun, ambat bider zure erredencioco obra eguiten dezu, ta Jesusen merecimentu guztiyetan parte eguiten cera.

Cergatic Jesusen amorioa ez da iñoiz guchitcen, ta aren misericordiaren anditasuna ez da iñoiz agortcen. Orregatic animaco prestaera berriyarequin onetaco beti prestatu bear cera, ta ondo consideratu bear dezu salvacioco misterio andi au. Añ andiya, berriya, ta gustosoa iruritu bear zaitzu Sacramentu au, celebratcen, edo meza entzuten dezunian, nola irurituco litzaitzuquen baldin egun artan bertan Jaungoicoaren Semea lembicico, Virgiñaren sabelera jachi, ta guizon eguingo balitzaque, edo gurutcean josiric egun artan munduaren salvacioagatic padecitu, ta ilco balitzaque.

## 3 CAPITULOA.

### *Gauza provechugarriya dala ascotan comulgatcia.*

C. Ona Jauna, ni zugana nator,

zure doayarequin ondo dijoaquidan, ta zure gozotasunian pobreari prestatu diozun zure convite santu onetan alegra nadin. Zugan dago, Jauna, nic deseatu aldezaquedan, ta premiya deran guztiya. Zu nere osasuna, ta nere erredencioa, esperanza, ta sendotasuná, edo indarra, honra, ta gloriya. Alegrazazu bada, Jauna, zure servitzariaren anima, cergatic zugana jaso det, nere Jesus ona, nere anima. Deseatcen det, Jauna, orain zu devocio, ta erreverencia andiyarequin errecibitcia, nere echean zu sartcea deseo det, Zaqueo bezala zugandic bedeicatua, ta Abranen semeen artian contatua izatia merecitceco. Nere animac zure gorputza deseatcen du, ta nere biotzac zurequin bat eguin nai du. Eman zaitez zerori niri; ta au asco det. Cergatic zutzaz

campora ez dago ecer valio duen consueloric. Zu gabe ecin egon naiz, ta zuc visitatu gabe, ecin vici ninteque. Eta erregatic, preciso da ni zugana maiz etortcia, ta nere osasunaren erremedioraco errecibitcia, Ceruco janariya errecibitu faltaz, videan illic gueldita ez nadin. Ala bada, zuc Jesus, guztiz urricaltsua, gendeari predicatcen, ta eri genero asco sendatcen cembiltzan demboran beñ esan cenuen: *Ez ditut echera babauric bialdu nai, videan goseac il ez ditecen.* Cristauben consueloagatic Sacramentuan gueldita ciñana bada, eguizu oraiñ au nerequin, cergatic zu cera animaren janari atseguiña, eta zu ondo errecibitcen zaituena, Ceruco gloriyan parte, ta heredo izango da. Precisoa da bada neretzat, aimbeste bider necatcen naizan, ta

pecatu eguiten, ta aiñ laster nä-
guitcen, ta animoa galtcen deran
onentzat, maiz eguiten dituran
oracio, ta confesioa mediante zure
Gorputz santua errecibitceco gra-
ciyan berritcia, garbitcia, ta ira-
zaquitcia, zu errecibitu gabe lu-
zaro egon, ta nere proposito san-
tuac utci ez ditzadan. *Cergatic
guizonaren sentiduac bere gazte-
tasunetic gaiitcera macurtuac dira*,
ta ez baldin badu zure erremedioac,
sócorritcen, gaiztoagoetan eror-
tcen da. Cergatic comunio san-
tuac gauza gaiztotic alde eragui-
ten dio, ta onean indartcen du.
Cergatic oraiñ, (comulgatcen na-
zalaric ere.) aiñ naguiya, ta epela
banago ascotan, ¿cer izango li-
tzaque, baldin zu, nere erreme-
dioa, artuco ez baciñuquet, ta
laguntce aiñ andiya billatuco ez
banuque?

Eta ez baldin banago ere egunero comulgatceco ondo prestatua, procuratuco det orregatic ere, zu maiz errecibitceco prestatcia, ta graciya añ andiyan parte izatia. Cergatic anima leyalaren consueloric principalena mundu onetan vici dan artean da, bere Jaungoicoaz maiz acordatcen dala, zu bere amantia devocioarequin errecibitcia. ¡O zure guganaco misericordia miragarriya! Zuc Jaun, eta Jaungoicoa, espiritu guztiyen sortzallea, ta vicitza emallea, anima pobrechoagana etorri nai dezula, ta zure jaungoicotasun, ta guizatasun guztiyarequin aren gosea ase nai izan dezula! ¡O zori oneco anima, zu bere Jaun, eta Jaungoicoa devocioarequin errecibitcia, ta zu errecibitcian consuelo espiritualaz betea izatia, mereci duena! ¡O ceñ Jaun

andiya errecibitcen duen! ¡Cer campotar maitea echean sartcen duen! ¡Cer lagun atseguiña icusten duen! ¡Cer adisquide leyala errecibitcen duen! ¡Cer esposo eder, ta nobleari laztan ematen dion! Amatuac diran guztiyac, ta deseagarri guztiyac baño gueyago amatua izatia, mereci duena. Issil bitez zure vistan, nere adisquide guztiz atseguiña, issill bitez Ceruac, eta lurrac, ta ayen edertasun guztiya; cergatic ayen, alabatcia mereci duen, ta edertasun guztiya, zuc emana dute, ta ez dira allegatuco iñoiz zure icen santuaren edertasunera, ceñaren jaquinduriyac numeroric ez du.

## 4 CAPITULOA.

### *Animaco ondasun asco errecibitcen dituztela ondo comulgatcen diranac.*

*C.* Presta nazazu, nere Jaun, eta Jaungoicoa, zure gozotasuneco bendicioaquin, zure Sacramentu miragarriya errecibitcera, ondo ta devocioarequin allegatcea, mereci dezadan. Muguizazu zugana nere biotza, ta libra nazazu naguitasun andi onetatic. Visita nazazu zure graciyarequin, Sacramentu onetan, bere iturrian osotoro estaliya dagoen, zure gozotasuna espirituan proba dezadan. Arguitzatzu ere nere beguiyac, misterio añ andiyari beguiratceco, ta indartu nazazu, ura gogotic sinisteco. Cergatic, zure obra da, ez guizonàc aldezaquena, zure eguite santua, ez guizonàc pen-

satua. Cergatic ezda misterio au entenditcero diña beréz iñor; ceña Aingueruen ezagueraz ere gañ da. ¿Cer bada nic pecatari miserable, lurra ta autsa naizan onec misterio añ santu, ta anditic comprendi dezaquet? Jauna, biotz humillarequin, fede on, ta sendoarequin, ta zure aguintearequin, allegatcen naiz zugana esperanza, ta errespetoarequin; ta eguiyaz sinisten det, zu emen presente zaudela aldareco Sacramentuan, Jaungoico, ta guizon eguiyazcoa. Nic zu errecibitcia nai dezu bada, ta nerau zurequin amorioan bat eguitia; orregatic zure misericordiari erregutcen diot, ta onetaraco gracia especiala eman dirazazula, erregutcen dizut, orrela zugan guztiya amorioz urtu nadin, ta gañez eguin dezadan, ta munduco consueloaz casoric

neyago eguin ez dezadan. Ceratic Sacramentu guztiz andi, ta miragarri au animaco, ta gorpuceco osasuna da, animaco eritaun guztiyen erremedioa, ceñian nere vicioac sendatcen dira, pasio, edo griña gaiztoai indarra quentcen zaye, tentacioac ventzutcen, edo guchitcen dira, graciya gueitcen da, virtute asiya ere bai, fedea sendotcen da, esperanza indartcen da, amorioa sututcen, ta zabaltcen da.

Asco ondasun eman izan dituzu bada Sacramentuan, ta oraiñ ere ascotan ematen diezcatzu devocioarequin comulgatcen diran zure adisquideai; bai nere Jaungoico ona, nere animaren errecibitzallea, gure eritasunaren sendatzallea, ta animaco consuelo guztiyaren emantzallea: cergatic asco consuelo neque ascoren con-

tra èmaten diezu, ta beren ecer ecetic zure laguńtzaren confianzarą jasotcen dituzu, ta alaco moduan graciya berri batequin barrendic consolatcen, ta arguitcen dituzu, ce lembician penatuac, ta devocio gabe comulgatu baño lenago berengan senti ciranac, guero Ceruco janari, ta erariyarequin mantenduric, obeagora aldatuac berengan arquitcen dira. Onela eguiten dezu zure escogituaquin, eguiyaz ezagutu dezaten, ta claro esperimentatu dezaten, ceñ ecer ezac diran berenez, ta cer ontasuna, ta graciya zugandic irichi duten. Cergatic, bĕrenez òtzac, gogorrac, ta devocio gabeac, baña zagandic sutubac, zure servicioan errazac, ta devotoac izatia merecitcen dute. Cergatic, ¿nor da atseguintasunaren iturrira allegagatcen dala, atseguintasun pisca

bat badere ateratcen ez duena? ¿Edo norc, su andiyaren ondoan egon ezquero, berotasun pisca bat sentitcen ez du? Zu bada, Jauna, iturri beti betea ta gañez eguiten dezuna cerà, beti sututuric zauden suba, ta iñoiz itzaltcen etcerana. Orregatic bada ez bazait ere libre iturri batetic artcia, ta ase arterano eratia, ipiñico det orregatic ere nere aboa Ceruco cañuaren zuloan, orrela badere tanto bat andic artu dezadan, guztiya legorturic gueldidu ez nadin, nere egarriya cerbait guchitceco. Eta guztiya cerutarra, ta sutuba Querubiñac, ta Serafiñac bezala oraindic ecin izan baldin banaiz ere, eguingo det orregatic ere aleguiña, devocioa iriganatceco, ta nere biotza prestatceco Jaungoicoaren amorioaren gar pisca bat badere, Sacramentu santua

humill errecibituaz, logra dezadan. Eta niri falta zaidan guztiya osazazu zure ontasunagatic, zuc nere Jesus ona, Salvadore guztiz santua, guztiyac zugana deitu nai izan dituzuna, esanaz: *Atozte nigana necatuac, ta cargatuac zaudezten guztiyac, ta nic consolatuco zaituztet.*

Necatcen naiz ni eguiyaz nere arpeguico icerdiyan, biotceco miñarequin tormentatcen naiz, pecatuz cargatcen naiz, tentacioaquin inquietatcen naiz, pasio gaizto ascorequin nastutcen, ta estutcen naiz; eta ezda iñor niri laguntceco, ni libratceco, ta salvatceco, ezbada zu nere Jaun, eta Jaungoicoa, nere Salvadorea. Zuri encomendatcen naiz nere gauza guztiyaquin, guarda nazazun, ta eraman nazazun betico vicitzara. Errecibi nazazu, zure icenaren alabanza,

ta gloriyan, zure gorputza, ta odola janari, ta eraritzat eman dizquidatzuna. Escatcen dizut azquenic, nere Jaun, eta Jaungoicoa, ta nere salvacioa, gueitu dedilla nigan, zure Sacramentua maiz errecibituaz, zuganaco devocioa.

## 5 CAPITULOA.

*Sacramentuaren anditasunaren, ta Sacerdotien estaduaren gañian.*

*J.* Izango baldin bacenuque ere Ainguerueu garbitasuna, ta San Juan Bautistaren santutasuna, etciñaque Sacramentu au errecibitceco, edo tratatceco diña izango. Cergatic ez da guizonen merecimentuai zor zayen gauzá, guizonac consagratcia, ta tratatcia nere Sacramentua, ta Ainguerueu oguiya janaritzat artcia. Misterio, ta dignidade andiya Sacerdoteena,

ceñai eman zaye, Aingueruai ere eman etzayena. Cergatic Elizan ondo ordenduac diran Sacerdoteac bacarric dute celebratceco, ta nere Gorputza consagratceco facultadea, edo potestadea. Sacerdotea eguiyaz Jaungoicoaren ministroa da, Jaungoicoaren aguintcez, ta eguitez beraren itzaz usatcen duena, baña Jaungoicoa da an eguille principala, ta icusi-ecin dana, ceñari sujeto dago berac nai duen guztiya, ta obeditcen dio aguintcen dion guztiyac. Gueyago sinistu bear diozu Sacramentu miragarri onetan guztiya aldezaquien Jaungoicoari; zure sentiduai, edo icusi alditequien beste senaleren bati baño, ta orregatic bildur, ta reverenciarequin allegatu bear dezu obra onetara. Izanzazu zutzaz contua, Sacerdotea cerana, ta considerazazu ondo cer empleoa eman

zaitzun Obispoaren escubac dirala medio. Orra, eguin cera Sacerdote, ta meza esateco consagratu cera, contu bada orain zure buruari, ofreci diozazun bere demboran leyaltasun, ta erreverenciarequin Jaungoicoari Sacrificioa; eta vici zaitez iñorc zugan erreprenditceco gauzaric icusico ez duen moduan. Etcenuen zure carga arindu, ezbada obligacio gueyagorequin lotu ciñan, ta santidadeco perfeccio gueyagora obligatua zaude. Virtute guztiyaz jantciya egon bear du Sacerdoteac, ta besteai egemplo ona ematera obligatua dago. Ez du aren conversacioac mundu onetaco guizonen conversacio ordinarioetan izan bear, ezbada Ainguеruaquin Ceruan, edo guizon virtuosoaquin munduan.

Sacerdoteac erropa sagradua-

quin jantciric nere empleoa eguiten du, bere buruagatic, ta bere progimoacgatic Jaungoicoari humil erregutceco. Bere aurretic, ta atcetic gurutcearen señalea dauca, nere pasioa beti gogoan iruqui dezan. Bere aurrean casullan gurutcea darama nere pausoac cuidadoarequin beguira ditzan, ta jarraitcia gogotic procura dezan. Atcean gurutcearequin señalatua dago, besteac ematen diozcaten cer sufritu guztiyac nigatic pacienciam eraman ditzan. Bere aurretic gurutcea darama bere pecatuacgatic negar eguin dezan; atcetic berriz, bestien pecatuacgatic ere erruquiz negar eguin de-

Españian. Estola requin au guztia.

zan, ta bera Jaungoicoaren, ta pecatarien artean bitarteco ipiñiya dala jaquin dezan, ta ez dezala oracioa, ta meza esatea utci graciya, ta misericordia alcantzatcia, merecci dezan arterañó. Sacerdoteac meza esaten duenian, honratcen du Jaungoicoa, Ainguerua alegratcen ditu, Eliza santari on andiya eguiten dio, viciai laguntcen die, illai descantsua ematen die, ta bera on guztiyen jabe eguiten da.

## 6 CAPITULOA.

*Galdetcen dio cristaubac Jesusi, cer eguingo duen; bera comunioan ondo errecibitceco.*

Consideratcen deranian, Jauna, zure anditasuna, ta nere ecer eza, asco bildurtcen naiz, ta nigan lotsaten naiz. Cergatic, baldin zugana allegatcen ez banaiz, vicitza-

tic igues eguiten det, ta bear bezala allegatceen ez banaiz, ofenditcen zaitut. ¿Cer eguingo det bada, nere Jaungoicoa, nere laguntzallea, ta necesidectan consejo emallea? Eracutsi zadazu zuc vide zucena. Eracutsi zadazu comunio santuraco prestatceco egoquiya dan egercicio laburren bat; cergatic, gauza provechugarriya da jaquitia, nola devocioarequin, ta humildadearequin prestatu bear deran nere anima, zure Sacramentua frutuarequin errecibitceco, baita ere celebratceco sacrificio an andi, ta Jaungoicozcoa.

## 7 CAPITULOA.

### Lenagoco aren errespuesta.

*Concienciaco esamiña, ta emendatceco propositoaren gañian.*

*J.* Gauza guztiyaz gañ, biotceco

humildade, ta errevercncia guztiz andiyarequin, fede bete, ta Jaungoicoari gusto emateco intencio garbiyarequin allegatu bear du Jaungoicoaren Sacerdoteac Sacramentu au eguitera, erabiltcera ta nola arc, ala beste eroceñec errecibitcera. Esaminazazu bada cuidado andiyarequin zure conciencia, ta zure aleguiñian damu eguiyazcoarequin; ta confesio humillarequin garbitu, ta arguituzazu, alaco moduan ece, ez dezula zugan pecatu mortalic senti. Izanzazu generalian zure pecatu guztiyen damua, ta eguneroco faltacgatic beréss, edo particularrian damutu zaitez. Eta dembora baldin badezu, confesa zayozcatzu zure bacarrian Jaungoicoari zure pasio gaizto guztiyen miseriyac.

Eguizu negar, ta penatu zaitez, oraindic aiñ araguizcoa, ta mun-

dutarra ceralaco, zure pasioetan aiñ guchi mortificatua, araguiyaren muguimentuz aiñ betea, zure sentiduai aiñ contu guchi eguiten d'ezuna, aimbeste bider asco pensamentu zoroz nastua, munduco gaucetara aiñ macurtua, ta animacoetaraco añ gogo guchicoa; añ erraza parraraco, ta zoraquerietan ibiltceco, añ gogorra zure pecatuacgatic damutceco, ta negar eguiteco; añ prontua gauza lasayagocoetaraco, ta gorputzaren conveniencietaraco, ta añ naguiya gauza estu, ta gogorretaraco, ta Jaungoicoaren servicioan gogotic empleatceco; gauza berriyac añ entzun naya, ta ederrac icusi naya; añ naguiya gauza humil, ta despreciatuac errecibitceco; añ guticiosoa asco naizateco, añ cicoitza emateco: añ beguiratu gabea itz eguiten, ta añ guchi mortificatua

issillic egoten: añ modestia gabea costumbreetan, ta añ era gabea obretan; añ emana janera, añ gorra Jaungoicoaren itzaraco; añ prontua descantsuraco; añ alferra bearraraco; añ atencio andicoa ecer valio ez duten gauzac entzuteco; añ logura oracioan egoteco; añ lasterra acabatceco; añ divertitua atenditceco, añ cuidado guchicoa errezoa eguiten; añ epela, celebratcen, ta meza entzuten, añ legorra comulgatcen, añ laster distraitu, edo divertitua, añ guchitan zugana guztiro bildua; añ bat batian irara muguitua, añ erraza besteri naigabea emateco, añ inclinatua besteac juzgatceco, añ gogorra iñor errepreuditceco, añ alegrea gauza favorableetan, añ ecer eza naigabeetan, añ ascotan gauz on asco eguiteco, propósituac artu ta guchi cumplitu.

Zure falta abec, ta gañeracoac zure miseriaren pena, ta nai gabe andi batequin aitorturic, ta negar eguiñic, artuzazu asmoa, zure vicitza beti emendatceco, ta virtutietan aurreratceco. Guero humildade, ta vorondate osoarequin escañi zaitez nere icenaren honran zure biotceco aldarian, zure gorputz, ta anima niri leyal entregatcen nazquitzula, orrela mereci dezazun, bear bezala Jaungoicoari sacrificioa ofrecitcera, allegatcia, ta nere gorputzaren Sacramentua frutuarequin errecibitcera, nola Sacerdotea cerana, ala etcerana. Cergatic, ez da pecatuac garbitceco ofrenda oberic, ta satisfacio andiyagoric bere buruba garbi, ta osotoro nere gorputzarequin batian mezan, ta comunioan Jaungoicoari escaintcia, edo ofrecitcia baño. Eguiten baldin badu per-

sonàc bere partetic alduena, ta eguiyaz damutcen baldin bada, barcacioa, ta graciya esque nigana datorren guztiyan logratuco du, cergatic esana daucat, ta juramentu eguiñaz alere; *ez deralu nai pecatariaren eriotza, ezbada converti dedilla, ta vici dedilla*; beragatic ez naiz acordatuco aren pecatuaz, ezbada guztiyac barcatuac gueldituco zaizca.

## 8 CAPITULOA.

*Jesus gurutcean Aita Eternoari ofrecitu zan bezala gu ere berari mezan, ta Comunioan ofrecitu bear guerala.*

J. Nola ni nerau gurutecean besoac zabalic, ta gorputz eramteiyarequin zure pecatuacgatic Aita Jaungoicoari vorondatez ofrecitu nintzayen, sacrificioan, ofrecitu

gabe, nigan ecer guelditcen etzala; ala zuc ofrecitu bear dirazu mezan ta comunioan vorondotez, aldituzun indar guztiyaquin, ta zure biotzaren barren barrenetic ofrenda santuan zure buruba. ¿Cer gueyago escatcen dizut,. ezbada procura dezazula cerori nere escubetan guztiro utcitcia? Zutzaz campora ematen dirazun guztiya ez det batere estimatcen, cergatic ez det billatcen ematen dirazuna, ezbada cerori. Nola zuc beste gauza guztiyac izanagatic, etcenuque, ni ez nazula, bear dezuna izango, ala niri ere ecin gustatuco zait ematen dirazun guztiya, cerori eman gabe. Ofreci zaitzaquit cerori niri, ta eman zaitzaquit guztiya Jaungoicoagatic, orrela izango da gustocoa zure ofrenda. Orra, ni guztiya ofrecitu niutzayon zugatic nere

Aitari, eman nizun ere nere Gorputz, ta Odol guztiya janaritzat, guztiya zurea izan nendin, ta zu guztiya nerea guelditu cinteceen. Baña ceregan guelditcen bacera, ta ez bacera vorondatez nere vorondatera ofrecitcen, ezda ofrenda osoa izango, ezta ere zugan, ta nigan bat eguite osoa. Zure obra guztiyen aurretic izan bear du bada, cere buruba vorondatez Jaungoicoaren escubetan ofrecitceac, nai baldin badezu animaco libertadea, ta graciya alcantzatu. Orregatic bada añ guchi Jaungoicoagandic arguituac, ta barrendic libreac eguiten dira, cergatic ez dituzte guztiro beren burubac ucatcen. Ecin falta dezaquien nere esana da: *Guztiyai utcitcen ez diena, ecin izan diteque nere discipuloa.* Nere discipuloa zuc izan nai baldin badezu

bada, ofreci zaitzaquit niri zure aficio guztiyaquin.

## 9 CAPITULOA.

*Gueroc, eta gure gauzac guztiyac Jaungoicoari escañi edo ofrecitu bear diozcagula, ta guztiyacgatic erregutu.*

*C.* Nere Jaun, eta Jaungoicoa, Ceruan, ta lurrian diran gauza guztiyac zureac dira; ta ala deseo dezu ere nerau cedorri vorondateco ofrenda ofrecitcia, ta zurea beti gueldit cia. Ofrecitcen naitzatzu bada, Jauna, gaur biotz humillarequin betico servitzaritzat betico alabantzaren honra, ta sacrificiotzat. Errecibi nazazu nere, ta zure Cristau guztiyen oneraco, icusten ez diran moduan presente dauden zure Ainguerucn aurrean ofrecitcen dizuran zure Gorputz

valiosoaren ofrenda onequin batian. Ofrecitcen dizquitzut, Jauna, zure aldarearen gañian uso arrazoyezcotic onara zure, ta Aingueru santuèn aurrean eguin dituran pecatu guztiyac, zure amorioaren subarequin guztiyac batian erre ditzatzun, nere pecatuen mancha guztiyac quendu ditzatzun, nere conciencia culpa guztiyetatic garbi dezazun, ta guztiyac niri barcatuaz, ta zure amorioan misericordiarequin errecibituaz, pecatu eguitez galdu nuen graciya biur dirazazun. ¿Cer eguin dezaquet nere pecatuacgatic, ezbada ayec humildadearequin confesatcia, ayecgatic negar eguitia, ta zure misericordia aspertu gabe escatcia? Erregutcen dizut, nere Jaungoicoa, entzun nazazula, zure aurrian aguertcen naizanian. Gorrotatcen ditut ecin gueyagorañio nere pe-

catu guztiyac, ez ditut gueyago eguin nai, ezbada damu det ayecgatic, ta vici naizan artian damu izango det, penitencia eguiteco, ta al deran satisfaccioa emateco, prest nagoala. Barcazadazu arren nere Jaungoicoa, barca zazquidatzu nere pecatu guztiyac zure icen santuagatic; salvazazu zure odol valiosoarequin erredimitu cenuen nere anima. Orra, zure misericordiara encomendatcen naiz, ta zure escubetan utcitcen naiz. Eguizu nerequin zure ontasunaz bat, ta ez nere gasstaqueriaz ta pecatuaz bat.

Ofrecitcen dizquitzut ere nere on guztiyac chit chiquiyac, ta faltatsoac baldin badira ere, zuc ayen faltac erremedia ditzatzun, ta santutu ditzatzun, zure gustocoac izan, ta eguin ditzatzun, ta beti obetu ditzatzun, eta ni nagui, ta

ecertaco ez nazan guizoncho au ere azquen zori oneco, ta alabatcecora eraman nazazun. Ofrecitcen dizquitzut ere persona devotoen desco on guztiyac, nere gurasoen, adisquideen, anayen, arreben necesidadeac, baita ere amatcèn dituran guztiyen, niri edo besteri zure amorioagatic on eguin diotenacgatic, eta oracioac, edo mezac beracgatic, ta beren guztiengatic, nic esatia deseatu, edo escatu dutenacgatic, naiz viciric egon ditecela oraindic, naiz illac dirala. Aben guztiyen necesidadeacgatic escatcen det bada, senti dezaten berengan zure graciyaren laguntza, consueloa, peligroetatic guardatcia, ta penatatic libertadea; orrela gaitz guztiyetatic libraturic, contentuarequin alabazaitzaten. Ofecitcen dizquitzut ere oracio, ta zure gustoco sacrificio

aber, batez ere ni cerbaitean ofenditu nautenacgatic, edo lotsatu nautenacgatic, edo beste gaitcen bat eguin diratenacgatic; baita ere nic noiz bait tristatu, lotsatu, edo penatu dituranacgatic, ta itcez, edo obraz, daquidala, edo ez daquidala escandalizatu dituranacgatic; gure pecatuac, ta alcarri eguin diozcagun gaizquiyac guztiyoi batian barcatu zazquigutzun. Quentcitzu, Jauna, gure biotcetic sospecha gaiztoac, aserreac, irà, ezda baidac, ta alcarganaco amorioari calte eguin, ta guchitu dezaquien guztiya. Erruqui zaitez, erruqui zaitez arren zure misericordia escatcen dutenaz, ta iguzu graciya ondo premiya degun oi, ta eguin gaitzatzu zure graciyaz gozatcia, ta Ceruco gloriyara allegatcia, mereci dezaquegun moducoac. Amen.

## 10 CAPITULOA.

### *Ez dala Comunio santua erraz utci bear.*

J. Maiz joan bear da graciyaren, ta Jaungoicoaren misericordiaren iturrira zure pasio, ta vicioetatic sendatcia logra dezazun ta deabruaren tentacio ta engañio guztiyen contra indarsuagoa, ta contuzcoagoa eguin zaitecen. Etsayac jaquiñic comunioan dagoen frutu, ta erremedio guztiz andiya, alditúen modu guztiyaz valiatcen da, cristaubac comuniotic atceratceco. Ascoc bada comulgatceco prestatcen asitcen diranian, bestietan baño deabruaren tentacio gaiztoagoac padecitcen dituzte. Etsay gaiztoa bera (Job santuaren libruan esaten dan bezala) sartcen da Jaungoicoaren semeen artian costumbratcen duen maliciarequin

asaldatutceco, ta guztiz bildurtiyac, ta dudosoac eguiteco, orrela Sacramentuaren ganaco ayen descoa guchitu dezan, edo aren contraco arguimentuaquin arganaco fedea galeraci diezaten, edo guztiro comunioa utci dezaten, edo ori ez badaere, beñepen devocio, ta gogo guechirequin comulga ditecen. Baña ezda casoric eguin bear aren tentacio, ta ilusioaz, izan ditezquien ciquiñenac, ta izugarriyenac izanagatic ere, ez bada guztiyac beraren buru gañera biurtu bear dira. Burla ta desprecioa eguin bear zayo miserábleari, ta ez da arc gugan alchatcen dituen tentacio, ta muguimentuacgatic comunio santua utci bear. Eragozten du ere ascotan, devocioa izateco, cuidado gueyeguiyac, ta confesatceco ansiya, edo escrupuloac. Eguizu jaquintsuac esatcn

dizutena, ta utcizazu ansiya, ta escrupuloa, cergatic eragozten du Jaungoicoaren graciya ta galtcen du devocioa. Ez dezazula trabaju chiquiren baten, edo pesalumbren baten motivoz Comunioa utci, ezbada zuaz laster confesatcera, ta barca zayezu gogoz gaitz eguin dizutenai. Baña zuc iñor ofendi-tu badezu, barcacioa gogoz escazayozu, ta Jaungoicoac gogoz zuri barcatuco dizu.

¿Cer provechu ateratcen da confesatu gabe luzaro egotetic, edo Comunio santua errecibitcia luzatcetic? Garbi zaitez lembaitlen, botazazu laster pecatuaren pozoya, zuaz lembaitlen erremedioa artcera, ta obeto sentituco cera zure animan, ori eguin gabe luzaro egonta baño. Baldin gaur gauz onegatic utcitcen badezu, bigar venturaz andiyagoren

bat guertatuco zaitzu, ta orrela comulgatcetic luzaro eragotci cintezque, ta guero ta prestaera guchiyagocoa artaraco eguin cintezque. Bota zazu lembaitlen zugandic sentitcen dezun astuntasun, ta naguitasuna, cergatic ez du ecer valio ansiyetan, ta sosegu gabe luzaro egoteac, ta egunero guertatcen diran eragozqueta, edo impedimentuacgatic comulgatcetic atceratciac; ezbada calte andiya eracartcen du comulgatu gabe luzaro egoteac, cergatic naguitasun andiya sortu oi du. ¡O gauza negargarriya! Jaungoicoaren servicioan epelac, ta beraren bildur guchicoac diran ascoc, animaren contu gueyagorequin vicitcera obligatuac icusi ez ditecen, deseatcen dute luzaro comulgatu gabe egotia. ¡O ceñ amorio, ta devocio guchi duten comunioa santua er-

recibitcia añ erraz luzatcen dutenac! Ceñ zori onecoa, ta Jaungoicoaren gustocoa dan alaco moduan vici dana, ta alaco garbitasunarequin bere concienciа guardatcen duena, ce eguncro comulgatceco ondo prestatua dagoala, ta pocic eguingo luquela, libertadea baldin balu, ta escandalo gabe eguin albalezaque!

Humildadez edo motivo justuren bategatic atceratcen baldin bada noizbait personen bat comulgatcetic, alabatcecoa da, Sacramentu Santuari dion errespetoagatic. Baña naguitasunac atceratcen badu, nuguitu bear du bere buruba, eguin bear du bere partetic alduena, ta Jaungoicoac lagunduco dio aren descoari voroudate onagatic, ceña batez ere beguiratcen du. Eta motivo justuren batec comulgatcia eragoz-

ten dionian, iruqui bear du cristaubac, comulgatceco vorondate ona, ta deseo santua, ta orrela etzayo Sacramentuaren frutua faltaco. Cergatic nai baldin badu cristau devotoac, egunero, ta ordu oro Comunio espirituala provechuarequin eguin dezaque; baña orregatic ere egun, ta dembora jaquiñetan allegatu bear du, bere Erredentorearen *Gorputza* erreverentcia andiyarequin errecibitcera, ta gueyago billatu bear du orretan Jaungoicoaren honra, ta alabanza, bere consueloa baño. Beste modutan prestatcen ez dana, ezbada jai eguna dalaco, edo costumbreac obligatcen duelaco, gaizqui prestatua egongo da gueyenian. Zori onecoa, meza esaten, edo comulgatcen duen guztiyan sacrificio, edo ofrendatzat guztiya Jaungoicoari ofrecitcen dana. E-

tzaitecela, Sacerdotea cerana, meza esaten ez luceeguiya, ta ez laburreguiya izan, ezbada jarraizazu prudenteen modua. Ez dezu orretan bestientzat enfadagarriya izan bear, ezbada zarraguac dispontcen dutenaz bat modu regularra jarraitu bear dezu, ta gueyago beguiratu bear diozu bestien provechuari, zure devocio particularrari baño.

## 11 CAPITULOA.

### *Jesusen Gorputza, ta Escritura sagraduba guztiz bearrac dirala cristaubarentzat.*

O nere Jesus guztiz gozoa, ceñ andiya dan zurequin zure mayan jaten duen anima devotac errecibitcen duen gozotasuna, ceñian etzayo beste janariric ipintcen, ezbada zu beraren adisquide bacar-

ta aren bioteeco deseo guztibaño deseagarriyagoa. Eta
iiyaz gauza gozoa izango litzae neretzat, zure aurrian biotz
iztitic negar eguitia, ta Magdana santac bezala zure oñac nere
egarraquin bustitcia. ¿Baña non ago devocio au? ¿Non negar san-
uen issurtce ugariya? Eguiyaz edorren ta zure Ainguerú san-
uen aurrean sututu bear luque nere biotz guztiyac, baita ere con-
sueloz negar eguin; cergatic eguiyaz presente zaucazquit Sacramen-
tuan, beste gauzaren antzarequin estaliric baldin bazaude ere: cer-
gatic zure, ta jaungoicozco arguitasunian zuri beguiratceco, ez
dute indarric nere beguiyac, ez ta munduco persona guztiyac ere
ez dute indarric, zure anditasunaren gloriyaco arguiyari begui-
ratceco. Nere argaltasunari begui-

yaturic bada, ezcutatu ciñan modu orretan Sacramentuan. Eguiyaz daucat, ta adoratcen det Ceruan Aingueruac adoratcen dutena bera, baña nic oraindic fedean, ta ayec bera dan bezala bere personan icusten dutela. Ni contentatu bear naiz oraiñ eguiyazco fedearen arguiyarequin, ta artan vici bear det betico arguiyaren eguna etorri daquidan artian, mundu onetatic Ceruco gloriyara joan nadin artian.

Allegatcen danian bada zori oneco egun ura, acabatuco da Sacramentuac errecibitcia, cergatic Ceruco gloriyan dauden zori onecoac, ez dute Sacramentuen erremedio bearric, cergatic gozatcen dira ecin gueyagoraño Jaungoicoarén aurrian arpeguiz arpegui beguiratcen diotela, ta gozatcen dute ere Aita Eternoaren

Semea guizon eguiña lembician izan zan, ta beti izango dan bezala. Gauza miragarri abetzaz acordatcen naizala, ecin eramangarriya izan dedilla neretzat erocen consuèlo espiritual ere, cergatic nere Jauna bere gloriyan argui icusten ez deran bitartian, ez daucat ecertan munduan icusten, ta entzuten dan guztiya. Testigu zaitut, Jauna, ecin ecerc consola nazaquela, ezda ere munduan dan creaturac ase, edo soseguan ipiñi, ezbada zuc nere Jaungoicoa, ceña beti gozatcia deseo det. Baña ecin diteque au, mundu onetan naizan bitartian: orregatic conveni da paciencia andiraco ni prestatcia, ta nere deseo guztiyan zure vorondatera sujetatcia; bada zurequin orañ Ceruan dauden Santuac ere fedean, ta paciencia andiyan ichoroten zuten, vici ciran

artian, zure gloriyaren etorrera. Ayec sinistu zutena, nic ere sinisten det, ayec esperatu zutena, nic ere esperatcen det, ayec zure graciyarequin allegatu ciran lecura, nic ere allegatu uste det. Bitartian fedean nabil Santuen egemploaquin sendoturic, libru santuac ere consuelotzat, ta ondo vicitceco servitcen diratela, ta aben guztiyen gañ zure Gorputz santuac erremedio, ta amparo especialtzat. Bi gauza bada iruritcen zaizquit guztiz bearrac neretzat mundu onetan, ceñac gabe ecin eramangarriya izango litzaidaque vicitza miserable au.

Gorputzaren carcela onetan nagoela bi gauzaren bear naizala aitortcen det, au da, janariyaren, ta arguiyaren. Eman cenidan bada niri miserable oni zure Gorputza animaren, ta gorputzaren man-

tenutzat, ta ipiñi cenuen zure itza lamparatzat nere oñetan. Abec biac gabe ecin ondo vici ninteque, cergatic Jaungoicoaren itza animaren arguiya da, ta zure Sacramentuya vicitzaco oguiya. Esan ditezque ere abec bi maya, alde batetic, ta bestetic Eliza santuco Sagrarioan paratuac. Maya bata da aldare santuco ogui santua, au da, nere Erredentorearen Gorputz santua dagoana. Bigarrena da Jaungoicoaren leguearen maya, eguiyazco fedea eracusten duen doctrina santua daucana, ta Jaungoicoa bera dagoen lecura gogotic eramaten duena. Milla esquer ematen dizquitzut, Jesus ona, betico arguiyaren arguiya, zure Profetac, Apostoloac, ta beste Doctore Santuac dirala medio ipiñi dirazun doctrina santaco mayagatic. Esquerrac zuri, gure guztiyon Egui-

lle, ta Erredentorea, cergatic zure amorioa mundu guztiyari aditcera emateagatic apari andiya prestatu cenuen, ceñian ez Juduen legueco arcumea, ezbada zure Gorputz ta Odòl guztiz santuac jatcoo ipiñi ciñizquigun, zure convite sagraduarequin cristau fiel guztiyac alegratcen dituzula, ta salvacioco calizarequin mosscortcen dituzula, ceñian daude Ceruco consuelo guztiyac, ta gurequin batean Aingueru santuac ere jaten dute, baña guc baño atseguintasun zori obeagocoarequin. (*)

¡O ceñ andiya, ta honrosoa dan Sacerdotien oficioa, ceñai eman zaye anditasunaren Jauna beren itz sa-

(*) Espirituco jatearequin.

graduaquin consagratceco facultadea, mingañaquin bedeincatceco, escuaquin iruquitceco, beren aboan errecibitceco, ta besteai emateco! O ceñ garbiyac izan bear duten escu ayec, ceñ garbiya aboac, ceñ santua gorputzàc, ta ceñ garbiya izango dan garbitasunaren eguillea aimbeste bider sartcen danaren biotza. Aimbeste bider bere Erredentorea Sacramentua errecibitcen duenaren abotic ez du irten bear santua, garbiya, ta provechugarriya ez dan itcic. Aren beguiyac tolesgabeac, ta garbiyac izan bear dute, bada Cristoren Gorputzari beguiratcera costumbratuac daude. Escubac garbiyac, ta Cerura jasoac, bada Ceruaren, ta lurraren Eguillea erabiltcen dute. Sacerdoteai batez ere esaten zaye leguean: *Izan zaitezte Santuac, cergatic ni zuen*

*Jauna, ta Jaungoicoa, santuá naiz.* Lagun dizagula guztiya aldezaquezun Jauna, zure graciyac, Sacerdotien oficioa artu degunoc bear bezala, ta devocioarequin garbitasun guztiyan, ta conciencia onean zuri servi dizazugun. Eta bear guenuquien beceñ vicitza santuan ecin izan bagaitezque ere, iguzu eguin ditugun pecatuacgatic bear bezala negar eguiteco, humildadearequin, ta vorondate onarequin zure aurrian servitceco graciya.

## 12 CAPITULOA.

### *Cuidado andiyarequin prestatu bear dala comulgatceco.*

J. Garbitasunaren amantia, ta santutasun guztiyaren emallea naiz ni. Biotz garbiya billatcen det nic, ta an da nere descantsu lecuba.

Presta zadazu apari lecu eder bat zure biotcean, ta celebratuco det an pascua nere Discipuloaquin. Nai baldin badezu, ni zugana etortcia, ta zurequin gueldítcea, garbizazu zure biotceco vici lecuba. Aztu zaitez mundu guztiyaz, quentcitzu zugandic vicio guztiyac, jarri zaitez zure bacarrean, ta pensatcitzu zure pecatuac animaco pena andiyarequin. Eroceñ amantec bada amatcen duenari lecu guztiz on, ta ederra prestatcen dio, cergatic onetan ezagutcen da amantia errecibitcen duenaren afectoa. Jaquinzazu orregatic ere ecin bear cenuquien arimbat prestatuco cerala, urte guztiyan prestatcen egongo baldin bariñaque ere, ta beste gauzaric burubaa iruquico ez bacenuque ere; ezbada nere misericordia, ta graciyagatic atcico zaitzu maya

asentura allegatcen, pobre bat o-
beratsaren mayera deitua izango
baldin balitzaque bezala, ta mesede
asco pagatceco humiltcia, ta esquer-
rac ematia beste gauzaric izango
ez baldin baluque bezala. Eguizu
zugan dana, ta cuidado andiyare-
quin alere; ez costumbre utsez,
edo ecin bestean, ezbada bildur,
erreverencia, ta amorioarequin er-
recibizazu zugana etorri nai izan
duen zure Jaun, ta Jaungoico
maitearen Gorputza. Ni naiz deitu
deranaj nic aguindu det eguiteco;
nic osatuco det zuri falta zaitzuna,
atoz, ta errecibi nazazu.

Devocioaren graciya ematen di-
zuranian, emayozcatzu esquerrac
zure Jaungoicoari, ez cergatic zuc
merechi dezun, ezbada cergatic zu-
maz erruquitu daizan. Ez baldin
badezu graci ori, ezbada llegos
senti bacera, amplea naitea tora-

cioan, negar eguizu, Jaungoicoaren atentaio deizazquiu ta etzaitecela gueldítu, piscacho bat badere graciya orretatic llogratu artian. Zu cera nere bear; ta ez ni zure, etzatoz ere zu ni santutcera, ezbada ni nator zu santutcera, ta obetutcera. Zu zatoz nigana llic santutua izatera, ta nerequin bat eguitera, graciya berriya errecibitceco, ta berriro emendatceco deseoan irazaquitceco. Ez dezazula despreciatu graci au, ezbada prestazazu çuidado guztiyarequin zure biotza; ta sartuzazu zugana zure amantia. Eta ez bacarric comulgatu baño lenago, procuratu bear dezu devocioarequin prestatcia, ezbada comulgatu ezquero ere devocioan irautia, cuidado andiyarequin procuratu bear dezu. Eta ezda comulgatu baño lenago devocioarequin prestatceco baño, de-

vocioan conservatceco cuidado gu-chiyago bear, comulgatu ezquero, cergatic guero devocioan, irautia, edo conservatcia graciya gueyago alcantzatceco prestaeraric onena da, ta asco galtcen du prestaera au, campoco gaucetara bereala zabaltcen danac. Alde eguizu bada orduan conversacioetatic, zaude zure bacarrean, ta zure Jaungoicoaz gozazazu: bada mundu guztiyac ecin quendu dizaquezuna bera dezu zurequin. Ni naiz, ceñari zu guztiya eman bear ceran, alaco moduan, ce etzaitecela aurrera zugan vici, ezbada nigan, batere cuidadoric gabe.

## 13 CAPITULOA.

*Biotz guztiyarequin deseatu bear duela anima devotac Jesusequin Sacramentuan bat eguitea.*

¡Norc emango dit niri, Jauna,

zu bacarric topatcia, nere biotz guztiya zuri aguertcia, animac deseo duen bezala zu gozatcia; eta ez nazala ya iñorc despreciatu, ta ez munduan dan creaturac muguitu edo beguiratu, ezbada zuc bacarric niri itz eguin dirazazula, ta nic zuri amanteac amantiari bezala, ta adisquidea adisquideaarequin itzquetan eguiten dan bezala. Au escatcen det, au deseatcen det; zurequin bat eguiña izatia, nere biotza munduco gauza guztiyetatic apartatcia, ta comunio santua dala medio Ceruco, ta betico gauzac gustatcen gueyago icastia. ¡Ai nere Jauna, eta Jaungoicoa! ¿Noiz egongo ote naiz zurequin guztiya (bat eguiñic) zugan itoa bezala, ta nitzaz guztiya azturic? Zu nigan, ta ni zugan, ta onela bioc batian egotia, arren indazu. Zu zera eguiyaz

nere maitea, millaren artian autua, ceñian nere vicitza guztiyan vicitoia gustatu zait. Zu cera eguiyaz nere paquetsua, ceñian dago eciñ gueyagorañoco páquea, ta descantsu eguiyazcoa, ta zutzaz camporа nequea, pena, ta ecin gueyagorañoco miseriya. Zu cera; éguiyaz Jaungoico estaliya, ta zure consejua, ezda gaiztoaquin; ezbada humillaquin, ta tolesgabeaquin da zure itz eguitea.

O ceñ atseguiña dan Jauna, zure espiritua, bada zure atseguintasuna zure semeetan aguertceco Cerutic jachitcen dan ogui guztiz gozoarequin mantendu nai dituzu. Ezda eguiyaz beste nacio añ andiric, bere Jaungoicoac bere alde dauzcazquienic, nola zu gure Jaungoicoà zure cristau fiel guztiyentzat, ceñai eguneroco consuelorace, ta Cerura biotza jaso-

tceco, jateco, ta gozatceco ematen cera. Cergatic, ¿cer nacio da cristiaubac baceñ noblea? ¿Edo cer creatura Ceruaren azpian añ amatua; nola bere Gorputz gloriosoarequin mantentceco, Jaungoicoa beregana sartcen zayon anima devota? ¡O ecin pondera ditequien graciya! ¡O mesede miragarriya! ¡O neurri gabeco amorioa, modu añ miragarriyan guizonari aditcera emana! Baña ¿cer biurtuco diot Jaungoicoari mesede onengatic, amorio añ andiyagatic? Ecin beraren gustoco gueyagoco gauzaric eman diozaquet, ezbada nere biotz guztiya berari entregatcia, ta biotz guztitic berarequin bat eguitea. Orduanche, esan deran bezala, nere anima Jaungoicoarequin bear bezala bat eguiten danian, nere errai guztiyac alegratuco dira. Orduan e-

sango dit, zuc nerequin egon nai baldin badezu, nic ere nai det zurequin egon: ta nic erantzungo diot: gueldita zaitez, Jauna, nerequin, nic pocic egon nai det zurequin. Au da nere deseo guztiya, nere biotza zurequin bat eguiñic egotia.

## 14 CAPITULOA.

*Jesus Comunioan errecibitceco person ascoc izan dituzten, ta dituzten deseo andiyac.*

¡O ceñ andiya dan Jauna, zure atseguintasunaren anditasuna zure bildurrecoentzat ezcutatu dezuna! Acordatcen naizanian zure Sacramentura devocio, ta amorio andiyarequin allegatcen diran devoto batzuetzaz, lotsatcen naiz ascotan neregan zure aldarera, ta comunioco mayera añ epel, ta

otz allegatcen naizalaco: ez nazalaco guztiro sutuba zure aurrean, ezta ere aiñ gogotic zu errecibitceco descoan irazaquiya, nola beste asco devoto izan ciran, céñac comulgatceco deseo, ta biotcian sentitcen zuten amorio andiyaren poderioz negarrez ecin gueldítu izaten ciran, ezbada biotceco edo animaco, ta gorputceco aboarequin zugana errai guztiyaquin suspiratcen zuten, zu deseatcen ciñuzten, beren gosea eciñ bestela guchitu, edo ase zutela, ezbada zure Gorputza atseguin, ta deseo espiritual guztiyarequin errecibituaz. O ceñ viciya zan ayen eguiyazco fedea, zu Sacramentuan presente zaudela ezagutceco, ez prueba chiquiya. Cergatic abec eguiyaz ezagutcen dute beren Jauna, oguiya partitcian, ceñen biotzac aiñ gogotic beren artian ira-

zaquitzen dira Jesus ayequin cergatic dabillen. Urruti dago ascotan nigandic orrelaco deseo, ta devocioa, amorio añ andi, ta alaco suba.

Beguira zadazu begui onaquin, Jesus ona, atseguiñ, ta erruquitsua, ta indazu arren niri, zure pobre oni zure amorio pisca bat badere Comunio santuan sentitcia noician beñ badere, nere fedea gueitu dedin, esperanzac zure ontasunean aurreratu dezan, ta beñ ondo irazaquiricaco amorioac, ta Ceruco janariya esperimentatu duenac iñoiz faltatu ez dezan. Al dezaquena da ere zure misericordia, deseatcen deran graciya, niri emateco, ta gustatcen zaitzunian, zure devocioa, ta amorioa ere bai: cergatic zure devoto añ andiyac bezalaco devocio, ta deseoric ez badet ere, orregatic ere zure graciyagandic deseo añ andi, ta ira-

zaquiyaren deseoa badet, escatcen, ta deseatcen derala zure amante añ irazaqui guztiyetan parte izatia, ta ayen compañia santuan contatua izatia.

## 15 CAPITULOA.

*Devocioco graciya humildadearequin, ta bere buruba ucatcearequin alcantzatcen dala.*

1. Conveni zaitzu, cristau maitea, devocioco graciya aspertu gabe billatcia, deseo andiyarequin escatcia, paciencia, ta confianzarequin ichorotia, gustora errecibitcia, humildadearequin contu eguitia, gogotic arequin obra onac eguitea, ta Jaungoicoaren escubetan bere visitaco dembora, ta modua datorren artian, utcitcia. Humillatu bear cera batez ere devocioric guchi, edo batere zure

barrenean senti ez dezunian, baña ez animoa guztiro galdu, ta gueyegui tristatu. Instante batian ascotan ematen du Jaungoicoac, luzaro ucatu zuena. Oracioaren azquenian ematen du ascotan, asieran ucatu zuena. Baldin beti bereala emango balitzaque graciya, ta batec nai duen guztiyan, prest egongo baldin balitzaque, ez litzaque persona animan eriyarentzat erraz eramangarriya izango. Orregatic esperanza onean, ta paciencia humillean esperatu bear du devocioco graciya. Eta zuri, ta zure pecatuai egotci bear diezu culpa, ematen etzaitzunian, edo issillic quentcen zaitzunian. Ascotan guchi bat da graciya eragozten, ta estaltcen duena, guchiya esan albaditeque, ta ez arrazoi gueyagorequin andiya, on añ andiya eragozten duena. Eta quen-

tcen badezu chiqui edo andi ori, ta bear bezala ventzutcen bacera, logratuco dezu escatu dezuna. Cergatic biotz guztitic Jaungoicoari entregatcen ceran beceñ laster, ta au edo bestea zure vorondatera billatcen ez dezun, ez bada guatiro argan jartcen ceran beceñ laster, topatuco cera berarequin bat eguiñic, ta sosegaturic, cergatic ez du ecerc aimbeste gusto emango, nola Jaungoicoaren vorondatea eguitiac. Bere deseoa bada, biotz humillarequin Jaungoicoagana jasotcen duena, ta criaturèn amoriotic garbitcen dana devocioco graciya errecibitceco, chit egoquia jartcen da, ta mereçi duena, izango du. Cergatic Jaungoicoac bere bendicioa, vàsoac utsic, au da, biotza mundu onetaco gauza guztiyen amoriotic erantciric topatcen duen lecuban

ematen du. Eta cembat eta obeto batec munduco gauzai utcitcen dien, ta bere burubaren desprecioa mediante beretzat gueyago ilcen dan, ambat eta lenago etortcen da graciya, ugariyago sartcen da, ta biotz librea gorago jasotcen du. Orduan icusico du, ta eceren faltaric izango ez du, arrituco da, ta zabalduco da aren biotza beragan, cergatic Jaungoicoac laguntcen dio, ta bera jarrizan guztiro aren escubetan, ta betico alere. Orra onela izango da bedeicatua, Jaungoicoa biotz guztitic billatcen duena, ta bere anima bear bezala estimatcen duena. Onelacoac asco merecitcen du, Comunio santua errecibitcian, Jaungoicoarequin bat eguiten duen graciya, cergatic ez du beguiratcen bere devocio, ta consuelora, ez bada devocio, ta consuelo guztiyen gañ

au bacarric topatcia, nere biotz guztiya zuri agoertcia, animac deseo duen bezala zu gozatcia; eta ez nazala ya iñorc despreciatu, ta ez munduan daan creaturac mu-guitu edo beguiratu, ezbada zuc bacarric niri itz eguin dirazazula, ta nic zuri amanteac amantiari bezala, ta adisquidea edisquidea-requin itzquetan eguten dan be-zala. Au escatcen det, au desea-tcen det; zurequin bat eguiña izatia, nere biotza munduco gau-za guztiyetatic apartatcia, ta co-munio santua dela medio Cerúco, ta betico gauzac gustatcen gue-yago icastia. ¡Ai nere Jauna, eta Jaungoicoa! ¿Noiz egongo ote naiz zurequin guztiya (bat eguiñic) zugan itoa bezala, ta nitzaz gui-tiya azturic? Zu nigan, ta ni zu-gan, ta onela biec batian egotia, arren indazu. Zu zara eguiyaz

nere maitea, millaren artian autua, ceñian nere vicitza guztiyan vicitoia gustatu zait. Zu cera eguiyaz nere paquctsua, ceñian dago eciñ gueyagorañoco páquea, ta descantsu eguiyazcoa, ta zutzaz campora nequea, pena, ta ecin gueyagorañoco miseriya. Zu cera, eguiyaz Jaungoico estaliya, ta zure consejua, ezda gaiztoaquin; ezbada humillaquin, ta tolesgabeaquin da zure itz eguitea.

O ceñ atseguiña dan Jauna, zure espiritua, bada zure atseguintasuna zure semeetan aguertceco Cerutic jachitcen dan ogui guztiz gozoarequin mantendu nai dituzu. Ezda eguiyaz beste nacio añ andiric, bere Jaungoicoac bere alde dauzcazquienic, nola zu gure Jaungoicoá zure cristau fiel guztiyentzat, ceñai eguneroco consuelorace, ta Cerura biotza jaso-

Ojala zure presenciarequin guztiro irazaquico baldin baninduzuque, erre, ta zugan mudatuco baninduzuque, espirituan zurequin bat eguiña izateco animaco bat izatearen graciyarequin, ta zure amorioan urtua izanarequin. Ez nazazula arren baraurik, ta legorric zugandic bialdu, ezbada izanzazu nitzaz misericordia, ta orretzaz bat nerequin eguizu, zure Santuaquin modu miragarriyan ascotan eguin izan dezun bezala. ¿Cer arritcecoa izango litzaque ni guztiya zugandic amorioan sututuco banitzaque, ta nigan ecereztuco banintzaque, zu izanic beti irazaquiric zauden suba, iñoiz guchitcen etcerana, ta biotzac garbitcen, ta adimentuac arguitcen dituen amorioa?

## 17 CAPITULOA.

### *Jesus Sacramentuan errecibitceco amorio, ta deseo andiyaren gañian.*

Devocio, ta amorio guztiz andiyarequin, ta biotz guztitic deseatcen det, Jauna, zu errecibitcia, asco Santu andic, ta persona devotoac deseatu izan duten bezala. O nere Jaungoicoa, betico amorioa, nere on guztiya, acabatu ecin ditequien zori ona, ecin gueyagorañoco deseoarequin zu errecibitu deseo det, ta oraindaño santuren batec ere sentitu ecin cezaquien aimbateco erreverenciarequin. Eta ezbadet ere mereci, aimbesteco devocioa izatia, ofrecitcen dizut orregatic ere nere biotzaren deseo guztiya, nic bacarric desco irazaqui ayec guztiyac izango baldin banituque be-

zala; baita erocen̄ anima devotac pensatu, ta deseatu alditzaquien guztiyac ofrecitcen dizquitzut erreverencia, ta devocioric danic andiyenarequin. Ez det neretzat ecer gueldítu nai, ezbada ni, ta nere gauza guztiyac zuri vorondatez, ta guztora sacrificatcen dizquitzut, zuri nere Jaun, eta Jaungoicoa, nere eguille, ta Erredentorea, ta alaco afecto, ta erreverenciarequin, alaco alabanza, ta honrarequin, alaco esquer, merecimentu, ta amoriorequin, alaco fede, esperanza, ta garbitasunarequin gaur errecibitu deseo zaitut, nolacoarequin errecibitu cin̄uen, ta deseatu cin̄uen zure Ama Maria Santisimac, zu bere errayetan guizon eguiteco berriya Ainguerua c eman cionian, humildade, ta devocioarequin erantzun cionian *Ona Jaunaren es-*

*clava, eguin bequit niri zuc esan dezun bezala.* Eta nola zure Precursore, Santu guztiyetan andiyena San Juan Bautista, oraindic bere amaren errayetan cegoala zure aurrean Espiritu Santuaren consueloarequin poztuzan, ta guero mundu onetan zu icuzten ciñuenian humildadez beteric devocio andiyarequin esaten zuen: *Berarequin dagoen, ta aditcen dion novioaren adisquidea alegratcen da novioaren itzarequin*, ala nic ere descatcen det deseo andi, ta sutuaz irazaquiya izatia, ta zuri nerau biotz guztitic entregatcia.

Orregatic ofrecitcen dizquitzut devoto guztiyen biotzen consueloac, deseo santuac, beren sentiduaz azturic, zugan pensatcen egotiac. Espiritu Santuaren ecin esan ditezquien bezalaco arguita-

sunac, ta icuste miragarriyac, Ceruan, ta lurrean diran, ta izango diran virtute, ta alabanzaquin; abec guztiyac ofrecitcen dizquitzut nigatic, ta oracioan encomendatu zaizquiran guztiyacgatic, guztiyengandic bear bezala beti alabatua, ta honratua izan zaitecen. Errecibitcitzu nere Jaun, eta Jaungoicoa nere ofrendac, ta ecin gueyagoco alabanzaco, ta neurrigabeco bendicioco deseoac, ecin esan ditequien bezalaco zure anditasunagatic arrazoyarequin zuri zor zaizquitzunac. Abec ematen dizquitzut, ta beti ematia deseatcendet; baita ere nerequin batian zuri esquerrac, ta alabanzac ematera, Ceruco Aingueru, ta Santu guztiyac, ta cristau fiel guztiyac convidatcen ditut, ta erregutcen ere badiet. Alaba zaitzatela, Jauna, erri, ta nacio guztiyac, ta

honra dezatela ecin gueyagoraño-co alegriya, ta devocioarequin zu-re icen santua, ta atseguiña. Eta zure Sacramentu guztiz santua, erreverencia, ta devocioarequin ce-lebratu, ta fede viciarequin erre-cibitcen duten guztiyac graciya, ta misericordia zugan topa deza-tela, ta ni pecatari onengatic hu-mildadearequin erregutu dezatela. Eta deseo duten devocioa, ta bat eguite atseguiña logratcen dute-nian, ta ondo consolatuac, ta mo-du miragarriyan alegratuac Ceru-co mai santutic irteten diranian, eguin dezatela caridade nitzaz acordatciaz.

## 18 CAPITULOA.

*Ez duela cristaubac Sacramentuco misterio santuaren esaminatzallea izan bear, ezbada Jesusen jarraitzalle humilla, bere iritziya fede santari sugetatuaz.*

Guardatu bear cera, cristau aitea, Sacramentu onetaco misterioac, edo bera nola dan comrenditu nayan ibiltcetic, ez balin badezu dudatan erori nai. nditasunaren esaminadorea daa, ichutua izango da anditasuna eragandic. Guizonàc entenditu ezaquien baño gueyago eguin ezaque Jaungoicoac. Humildaearequin, eguiya jaquin nayan, iltcia persona, beti prest dagoebestegandic eracutsiya izateco, Elizaco Guraso santuen doctriic jarraitceco, ezta au gauza iztoa. Zori onecoa, dificultadien

vide gaitza utcita, mandamentuen vide seguru, erraz, ta sendotic dabillena. Ascoc galdu zuten devocioa, beren gañ ciran gauzac esaminatcen asi ciralaco. Fedea, ta vicitza santua escatcen zaizquitzu zuri, ez entendimentu andiya, ta misterioen ezaguera. Ez baldin badituzu entenditcen, ta comprenditcen zure bean dauden gauzac, ¿nola comprendituco dituzu zure gañ daudenac? Sujeta zaitez Jaungoicoari, ta humilla zayozu zure iritziya fedeari, ta emango zaitzu conveni zaitzun, ta premiya dezun jaquinduriyaren arguiya. Asco chit tentatuac dira fedean, ta Sacramentuaren gañian, baña etzaye onen culpa ayei bota bear, ezbada etsayari. Etzaitecela estutu onelaco ocasioetan, etzaitecela zure pensamentuaquin arguimentuetan egon, ezta ere deabruaren

dai erantzun, ezbada sinistu
ezu Jaungoicoaren itzai, sinistu
ezu aren Santu, ta Profetai, ta
ies eguingo du zugandic etsa-
. Asco conveni da ascotan Ja-
goicoaren servitzariyac orrelaco
uzac sufritcia. Ez ditu bada fe-
gabeac, ta Jaungoicoaren bil-
rric ez dutenac orrela tentatcen,
rgatic seguru daucazqui; cris-
a catolicoac, ta devotoac orrela
ntatcen, ta penatcen ditu.

Zuaz fede humil, ta duda ga-
ecoarequin, ta allega zaitez er-
verencia humillarequin Sacra-
entura; eta zuc ecin entenditu
ezun guztiya utcizazu cuidado
abe Jaungoicoaren contura. Etzai-
a engañatcen Jaungoicoac, bere
arubari gueyegui sinisten diona
ngañatcen da. Humillaquin ibil-
en da Jaungoicoa, ta ayei aguer-
en zaye, ayei ematen die enten-

dimentua; biotz garbiyai ematen die gauzaren ezaguera, ta ucatcen die curiosoai, ta soberboai. Guizonaren ezaguera laburra da, ta engañatu ditequena, baña ecin engañatu diteque eguiyazco fedea. Guizonaren entendimentuac eta ezaguerac fedeari jarraitu eguin bear dio, ta ez aurreratu, ta aren contra joan. Cergatic fedea, ta amorioa guztiz asco aguertcen dira Sacramentu guztiz santu ta miragarri onetan, ta ezagutcen ez diran modu ascotara eguiten dute. Jaungoico beticoac, ta neurri gabeac, ta pensatu alditequien baño gueyago aldezaquenac gauza andiyac, ta ecin comprendi ditezqueenac eguiten ditu Ceruan, ta lurrean, ta ala ezda cer esamiñaturic aren gauza miragarriyac. Guizonaren entendimentuac erras comprendi dizaquenac baldin ba-

liraque Jaungoicoaren obrac, ez litzayeque deituco miragarriyac, ta ecin esan ditezquenac.

*Emen acabatu da libru santu au.*

Jaungoico bacarrari
Honra, ta alabanza
Ni pecatariyari
Ceruraco seguranza.

JESUS vici dedilla
ta ala izan dedilla.





*SACRAMENTU ALDARE-coaren gañian itz eguin ezquero, ez dira emen gaizqui etorrico cantacho abec. Gure Jesus onac, ta Ama Virgiñac ere canta o-nac cantatcen cituzten; ta Vir-giñac berac Jaungoicozco can-tac guc baño habilidade gue-yagorequin compontcen, edo a-teratcen cituen, ta berac can-tatcen cituen.*



*Elizaco Sacris solemnisen donuan cantatcen dira.*

Ogueita sei verso
Nua cantatcera,
Jauna alabatceco,
Nua asitcera,
Betoz nai dutenac;

Abec aditcera,
Dira Jaungoicoarenac.
¡O arrigarriya
Icusten derana!
Da zoragarria
Siniisten derana,
Ecer ez batean
Andiena dana
Dago mundu zabalean.
Anima nerea,
Considerazazu,
Cristau chit maitea,
Arren pensazazu,
Ta zure buruan
Beti iruquizazu
Dagoena onela munduan.
Gauza chit chiquian
Danic andiena,
Ostia batean
Gauzaric onena,
Onela arquitcen da
Eguin cinduena,
Iñor guchi oroitcen da.
O cer pensatcen det

Nic egun guztian!
Cer nic eguiten det
Egun ta arratsian?
Ez det nic pensatcen
Mirari añ andian,
Ala ez det adoratcen.
  Jaun pare gabea,
Adoratcen zaitut,
Jaun guztiz maitea,
Nic amatcen zaitut,
Bada aldarian
Or icusten zaitut
Modu guztiz humillian.
  Andia izan ta ere
Guztien gañian,
Ez dezu batere
Ezagun ostian,
Zu or sinisturic
Modu añ humillian,
Gaude guztiz arriturie.
  Baña Jesus ona,
Itz eguin bear dizut
Izanic guizona,
Au galdetçen dizut,

Cer gusto cenduen,
Aditu nai dizut,
Orrela gueldit ceco emen.
Ai cristau maitea,
Esaten dirazu,
Naiz zure jabea,
Bada adizazu,
Amorez nintzala,
Arren siniszazu,
Jarri nagoen bezala.
Nere atseguiñac
Dira personaquin,
Nere aleguiñac
Egotea beraquin,
Ala nai izan nuen
Milagro andiaquin
Guelditu zuequin emen.
Amorio onetzaz
Nor da acordatcen?
Mundu zoro orretzaz
Cerate zoratcen,
A esquer gabeac,
Nola da au pasatcen?
Esquer gaizto emalleac.

Gabaz, ta egunez
Ni beti Elizan,
Zuec casoric ez
Baicican guchitan,
A cristau zoroac,
Nai dezute izan
Orreñ esquer gaiztocoac?
Munduco andiac
Acompañatuac,
Ta nitzaz guztiac
Zaudezte aztuac,
A biotz gogorrac,
A engañatuac,
Zaudezte neretzat gorrac.
Lagun onarequin
Egon nai dezute,
Baña guchirequin
Logratcen dezute,
Ona emen nago,
Ni nai banazute,
Ni beciñ onic ez dago.
Emendic aurrera
Maizago joango naiz,
Jauna, zure echera,

Orchen egongo naiz,
Zu acompañatcen,
Ta gozatuco naiz,
Aleguiña zu alabatcen.
Ecin deranian
Zugana allegatu,
Ceren nere echian
Bear deran gueratu,
Andic eguingo det
Zu or adoratu,
Zugan maiz pensatuco det.
Oraindic gueyago
Anima garbia,
Orrequin ez dago
Eguiña guztia,
Ni emen naucazu
Zure janaria,
Ala maiz artu bear nazu.
Ya nere goseric
Ez dago zuetan,
Ni maiz artzalleric
Guchi guztietan,
¿Cer arrazoirequin
Vici Ceruetan,

Uste dezute nerequin?
Zuen amorioz
Emen zoraturic,
Zuen suspirioz
Emen humilduric,
Baña naucazute
Despreciaturic,
Arren artu nazazute.
Zuen premiaric
Ez det nic ispiric,
Zuen onagatic
Onela jarriric,
Arquitcen naiz emen
Janari eguiñic,
Jartceco zuen barrenen.
Ondo daquizute
Dala au eguia,
Baña daucazute
Viotza naguia,
Beti paraturic
Mundura beguia,
Zuen animac galduric.
Indar guchirequin
Anima da arquitcen,

Ez banau berequin
Maiz errecibitcen,
Etsayac argatic
Asco du eguiten,
Zuec ni ez artceagatic.
Argui zaitezte beñ
Au ezagutceco,
Atozte lembaitlen,
Ni errecibitceco,
Jarriric gracian,
Ala mantentceco,
Mayaric dan onenian.
Arrazoya dezu
Jaun maitagarria,
Ondo esan dezu
Jaun zoragarria,
Zuc beti daucazu
Gure egarria,
Ta zutzaz guera gu aztu.
Nic ezagutcen det
Nere esquer gaiztua,
Bertatic artcen det
Zu ganaco asmua,
Oraindaño egon naiz

Zutzaz chit aztua,
Baña ya egongo ez naiz.
Aldan ondocna
Zugan biurturic,
Alderan maicena
Ondo prestaturic,
Or izango nazu,
Culpac lajaturic,
Zure gracia indazu.
Zu artuarequin
Maiz modu onetan,
Izatea zurequin
Ceru altuetan,
Esperatuco det
Nere egunetan,
Baita ere logratuco det.
Amen.

*Ara estribilloa.*
*Nai baldin bada bi versotic bi versora bezala cantatu.*

*ESTRIBILLOA.*
*Muguitu gaitecen*

*Jauna adoratcera,*
*Anima gaitecen*
*Maiz visitatcera,*
*Bai Sacramentuan,*
*Eta artutcera*
*Anima ondo garbituan.*



Lau libru chiqui daude libru onetan, ta bacoitzac daeazquien capituloac ipiñico ditut non topatcen diran numeroarequin, gusto dana errazago topatceco.

## LEMBICICO LIBRUBA.

1. Capituloa. *Jesusen imitacioaren, ta munduco vanidadeen desprecioaren gañian num.* . . . . . . . . . . . . 1
2 Cap. *Bacoitzac bere buruaz humil pensatu bear duela. n.* . . . . . . 5
3 Cap. *Eguiyaren doctrinaren gañian n.* 8
4 Cap. *Eguin bear ditugun gaucetan izan beardegun prudenciaren gañean n.* 14
5 Cap. *Nola iracurri beardan Escritura sagraduba. n.* . . . . . . . . . . . 16
6 Cap. *Arrazoyarequin ondo ez datocen aficioen gañean. n.* . . . . . . . . 18
7 Cap. *Nola igues eguin bear degun esperanza vano, ta soberbiatic. n.* 20
8 Cap. *Adisquidetasun gueyeguiya igues*

*eguin beardala. n.* . . . . . . . . . 22
9 Cap. *Obediencia, ta sugecioaren gañean. n.* . . . . . . . . . . . . . . 24
10 Cap. *Itz gueyegui eguitetic apartatu bear degula. n.* . . . . . . . . . . 26
11 Cap. *Nola animaco paquea alcatzatcen dan, ta Jaungoicoaren servicioan aprovechatceco deseoaren gañean. n.* 28
12 Cap. *Neque, ta persecucioetatic datorren provechuaren gañean. n.* . . 32
13 Cap. *Nola tentacioai contra eguin bear diegun. n.* . . . . . . . . . . 34
14 Cap. *Ez dezagula iñor juzgatu. n.* 40
15 Cap. *Jaungoicoaren ta progimoaren amoriotic sortcen diran obren gañean. n.* . . . . . . . . . . . . . . . 43
16 Cap. *Besteren faltac sufritu bear dirala. n.* . . . . . . . . . . . . . . 45
17 Cap. *Religioan cer modutan vici bear dan. n.* . . . . . . . . . . . . . . . 48
18 Cap. *Santuen egemploen gañean n.* 50
19 Cap. *Relrgioso onaren egercicioen gañean. n.* . . . . . . . . . . . . . . 55
20 Cap. *Soledade, edo bacartasunaren gañean. n.* . . . . . . . . . . . . . . 61
21 Cap. *Biotceco damuaren gañean n.* 69
22 Cap. *Gure miseriaren gañean. n.* 73

23 Cap. *Eriotzaren consideracioaren gañean.* n. . . . . . . . . . . . . . . . 80
24 Cap. *Jaungoicoaren juicioaren, ta pecatarien penen gañean.* . . . . . 87
25 Cap. *Gure emiendaren cuidado andigaren gañean.* n. . . . . . . . . . . 95

## BIGARREN LIBRUBA.

1 Cap. *Barrengo, edo animaco conversacioaren gañean.* n. . . . . . . 105
2 Cap. *Humil sufritcearen gañean n.* 113
3 Cap. *Persona on, ta paquetsuaren gañean.* n. . . . . . . . . . . . . . . 115
4 Cap. *Biotz garbiyaren, ta intencio onaren gañean.* n. . . . . . . . . . . . 118
5 Cap. *Bere buruaren consideracioaren gañian. n.* . . . . . . . . . . . . . . 120
6 Cap. *Conciencia onaren alegriyaren gañean.* n. . . . . . . . . . . . . . 123
7 Cap. *Jesusi gauza guztiyaz gañean bear diogun amorioa. n.* . . . . . 127
8 Cap. *Jesusen adisquidetasunaren gañean. n.* . . . . . . . . . . . . . . 129
9 Cap. *Consueloric batere gabe egotiaren gañean n.* . . . . . . . . . . 134
10 Cap. *Jaungoicoari bere graciyagatic*

eguin bear zayon exaguiera, edo agradecimentuaren gañian n. . . . . 141
11 Cap. Jesusen gurutcearen amantiac ceñ guchi diran. n. . . . . . . . . 146
12 Cap. Gurutce santuaren vide seguruaren gañean. n. . . . . . . . . 150

## IRUGARREN LIBRUBA.

1 Cap. Jesusec anima leyalarequin duen barrengo conversacioaren gañian n. 163
2 Cap. Erregutcen dio christaubac Jaungoicoari bere animan itz eguiteco n. 165
3 Cap. Jaungoicoaren itzac humildadearequin entzun bear dirala ta nola ascoc estimatcen ez dituzten n. 68 Devocioaren graciya escatceco: Oracioa n. 172
4 Cap. Eguiyarequin, ta humildadearequin Jaungoicoaren beguiyetan ibilli bear dala n. . . . . . . . . . . . . 174
5 Cap. Jaungoicoaren amorioaren eguite miragarriyaren gañian n. . . . . 178
6 Cap. Eguiyazco amantiaren pruebaren gañean. n. . . . . . . . . . . . . 185
7 Cap. Nola Jaungoicoaren graciya humildadearequin gorde bear dan n. 190
8 Cap. Jaungoicoaren beguiyetan bere

buruba ecer ecian iruquitciaren gañian n. . . . . . . . . . . . . . . . 196
9 Cap. *Gauza guztiyac Jaungoicoagana, guztiyen azquen fiña dan bezala zucendu bear ditugula n.* . . . . . 199
10 Cap. *Mundua despreciatuta Jaungoicoa servitcia gauza atseguiña dala n.* . . . . . . . . . . . . . . . . 201
11 Cap. *Biotceco deseoac examinatu bear dirala, ta bear dan modua para bear zayela. n.* . . . . . . . . . . 206
12 Cap. *Paciencia cer dan, ta griña gaiztoen contraco pelearen gañian n.* 208
13 Cap. *Jesusen exemplora mendeco humillaren abedienciaren gañian n.* 212
14 Cap. *Jaungoicoaren juicioac consideratu bear ditugula, gauz ònetan soberbiaz bete ez gaitecen. n.* . . 215
15 Cap. *Nola egon, ta itz eguin bear degun desea ditezquien gauza guztiyetan, n.* 218. *Jaungoicoaren gustoa beti eguitia alcantzatceco : oracioa.* 220.
16 Cap. *Eguiyazco consueloa Jaungoicoagan bacarric billatu bear dala n.* 222
17 Cap. *Jaungoicoagan ipiñi bear dala cuidado guztiya. n.* . . . . . . . . 224
18 Cap. *Mundu onetaco miseriyac Je-*

*tisen imitaciora pacienciaa eraman bear dirala. n.* . . . . . . . . . . 227
19 Cap. *Injuriyac sufritciaren gañian, ta ceñ dan eguiyaz sufritua. n.* . . 230
20 Cap. *Personac bere ecer ezaz eguiten duen aitormena, ta mundu onetaco miseriyen gañean. n.* . . . . . . 234
21 Cap. *On, ta doai, guztiyen gañ Jaungoicoagan dezcantsatu bear dala. n.* 238
22 Cap. *Jaungoicoaren mesedeen oroipenaren gañean. n.* . . . . . . . . 244
23 Cap. *Animaco paqueraco asco laguntcen duten lau gauzaren gañian. n.* 249
*Pensamentu gaiztoen contraco Oracioa* 250 *Beste bat entendimentua arguitceco* 252.
24 Cap. *Besteren vicitzaric examinatu bear ez degula. n.* . . . . . . . . 254
25 Cap. *Certan dagoen biotceco paque lucia, ta eguiyazco aurreratcea. n.* 256
26 Cap. *Eguiyazco libertadea duen animaren altitasuna, ceña iracurtciarequin baño, oracio humillarequin gueyago alcantzatcen da. n.* . . . 259
27 Cap. *Jaungoicoaz campoco beste erocem gauzaren amorioac asco atceratcen duela on guztiyen onetic. n.* 262

*Biotceco garbitasuna, ta Ceruco jaquinduriya alcantzaceco Oracioa.* 265
28 Cap. *Murmuratzallien contraco consejua. n.* . . . . . . . . . . . . . . . 266
29 Cap. *Nola gure naigabe, ta pena guztiyetan Jaungoicoa deitu, ta alabatu bear degun. n.* . . . . . . . 268
30 Cap. *Jaungoicoaren graciya escatcearen, ta berriz errecibitceco confianzaren gañian. n.* . . . . . . . 270
31 Cap. *Nola Creadorea topatceco criatura guztiyac despreciatu bear diran n.* 275
32 Cap. *Berc buruba ucatciaren, ta mundu onetaco gauza guztiyen deseoa utzitciaren gañean. n.* . . . . . 280
33 Cap. *Ceñ aldacorra dan gure biotza, ta gure intencioa gauza guztiyetan Jaungoicoagana chussendu bear degula. n.* . . . . . . . . . . . . . . . . . 283
34 Cap. *Amatzen duenari gauza guztiyac baño gueyago, ta gauza guztiyetan gustatcen zayola Jaungoicoa. n.* 285
35 Cap. *Ez dagoela vici gueran artian tentacioaz seguridaderic. n.* . . . . 289
36 Cap. *Ez dala casoric eguin bear personen juzguacgatic. n.* . . . . . . 292
37 Cap. *Biotceco libertadea, edo anima-*

*coa logratceco bere buruba guztiro ucatcearen gañian. n.* . . . . . . . 265
38 Cap. *Animaz campoco gaucetan nola governatu bear gueran, ta Jaungoicoa peligroetan billatu bear degula n.* 297
39 Cap. *Ezduela personac cuidado gueyegui bere negocio, edo eguitecoetan iruqui bear. n.* . . . . . . . . . . 300
40 Cap. *Ez duela guizonac, edo personac berez gauz onic, ta ecin ecertzaz arrotu, edo gloriyatu ditequela. n.* . . . 302
41 Cap. *Munduco honra guztiya despreciatu bear dala, edo ez dala penatu bear desprecioacgatic.* . . . . . . . 306
42 Cap. *Ez degula personetan gure paquea ipiñi bear. n.* . . . . . . . . 307
43 Cap. *Jaquindurtya zoro, ta mundutarraren contra. n.* . . . . . . . . . 309
44 Cap. *Ez dituela cristau espiritualac animaz campoco gauzac bereganatu bear n.* . . . . . . . . . . . . . . 313
45 Cap. *Etzayela guztiai sinistu bear, ta ceñ erraz itzquetan uts eguiten dan n.* . . . . . . . . . . . . . . . . . 315
46 Cap. *Jaungoicoagan confiatu bear degula, gugatic besteac gaizqui esaten dutenian. n.* . . . . . . . . . . . . . 320

47 Cap. *Neque guztiyac Ceruco gloriyagatic sufritu bear dirala. n.* . . 325
48 Cap. *Eternidadeco egunaren, ta vicitza onetaco miseriyen gañian n.* 329
49 Cap. *Ceruco gloriyaren deseoaren gañian, ta ceñ andiyac diran argatic peleatcen dutenentzat aguinduac dauden ondasunac. n:* . . . . . . . . . 335
50 Cap. *Nola espirituan penatua, ta consuelo gabe dagoen persona Jaungoicoaren escubetan jarri bear dan n.* . 343
51 Cap. *Andiyac falta diranian, obra humilletan empleatu bear dala n.* 350
52 Cap. *Ez duela, consueloric mereci duela, pensatu bear Christabac, ez bada castiguac. n.* . . . . . . . . . . . . 351
53 Cap. *Ez duela Jaungoicoaren graciyac munduco gauzac guztaicen zaizcatenaquin egon nai izalen. n.* . . . 355
54 Cap. *Naturalezaren, ta graciyaren muguimentu diferentien gañian n.* 359
55 Cap. *Ceñ erraza dan naturaleza gauza gaiztoraco, ta graciyaren indarraren gañian. n.* . . . . . . . 368
56 Cap. *Gure buruba ucatu, ta gurutcea mediante Jesusi jarraitu bear diogula. n.* . . . . . . . . . . . . . . . 374

57 Cap. *Ez duela eri-taubac, faltaren batzueten eroriagatic, animoa galdu bear. n.* . . . . . . . . . . . . . . . 378
58 Cap. *Gure ezagueraz gañeco gauzac, ta Jaungoicoaren juicio ezcutuac ez dirala esaminatu bear. n.* . . . . . 381
59 Cap. *Esperanza, ta confianza guztiya Jaungoicoagan bacarric ipiñi bear dala n.* . . . . . . . . . . . . . . . 390

## LAUGARREN LIBRUBA.

Jesusec comuniora eguiten duen deya.

1 Cap. *Erreverencia ceñ andiyarequin Jesus errecibitu bear dan n.* . . . 396
2 Cap. *Jaungoicoaren ontasun, ta amorio andiya ematen zaigula aditcera aldareco Sacramentuan. n.* . . . . 407
3 Cap. *Gauza provechugarriya dala ascotan comulgatcia. n.* . . . . . . . 413
4 Cap. *Animaco ondasun asco errecibitcen dituztela ondo comulgatcen diranac n.* . . . . . . . . . . . . . . . . 419
5 Cap. *Sacramentuaren anditasunaren, ta Sacerdotien estaduaren gañian n.* . . . . . . . . . . . . . . . . . . 425
6 Cap. *Galdetcen dio Cristaubac Jesusi,*

*ter eguingo duen bera Comunioan ondo errecibitceco. n.* . . . . . . . . . . . 429

7 Cap. Lenagocoaren errespuesta. *Concienciaco esamiña, ta emendatceco propositoaren gañean. n.* . . . . . 430

8 Cap. *Jesus gurutcean Aita Eternoari ofrecitu zan bezala gu ere berari mezan, ta comunioan ofrecitu bear guerala n.* . . . . . . . . . . . . . . 435

9 Cap. *Gueroc, eta gure gauzac guztiyac Jaungoicoari escañi edo ofrecitu bear diozcagula, ta guztiyacgatic erregutu n.* . . . . . . . . . . . . . . . . . 438

10 Cap. *Ez dala Comunio santua erraz utci bear. n.* . . . . . . . . . . . . 443

11 Cap. *Jesusen Gorputza, ta Escritura sagraduba guztiz bearrac dirala cristaubarentzat. n.* . . . . . . . . . . . 449

12 Cap. *Cuidado andiyarequin prestatu bear dala comulgatceco. n.* . . . 457

13 Cap. *Biotz guztiyarequin deseatu bear duela anima devotac Jesusequin Sacramentuan bat eguitea. n.* : . 461

14 Cap. *Jesus Comunioan errecibitceco person ascoc izan dituzten, ta dituzten deseo andiyac. n.* . . . . . . . . . 465

15 Cap. *Devocioco graciya humildadea-*

requin, ta bere buruba ucatceareqüin alcantzatcen dala. n. . . . . . . . . 468
16 Cap. Gure premiyaç Jesusi aguertu, ta bere graciya escatu bear diogula n. 472
17 Cap. Jesus Sacramentuan errecibitceco amorio ta deseo andiyaren gañian. n. . . . . . . . . . . . . . . . . . 475
18 Cap. Ez duela Cristaubac Sacramentuco misterio santuaren esaminatzallea izan bear, ezbada Jesusen jarraitzalle humilla, bere iritziya fede santuari sugetatuaz. n. . . . . . . . . . . . . 480

# UTSEGUITEN ZUCENTCIA.

Cer numerotan, an cembat garren erengloyan.

| Numeroa. | Errengloya. | Utseguiña | Zucendua edo nola letu bear dan. |
|---|---|---|---|
| 4[illegible] .. | 22 | gu . . . . . | guo |
| 68 .. | 9 | izuste . . . . | icuste. |
| 68 .. | 16 | dizquitzutcetan . | dizquitzunetan. |
| 83 .. | 19 | guchi santifica- tcen . | guchitan santu- tcen. |
| 88 .. | 10 | beste . . . . | bestec. |
| [illegible] .. | 15 | ifernu . . . . | infernu. |
| 133 .. | 20 | azoteraco . . . | azotetaracor |
| 217 .. | 8 | cargu . . . . | carga. |
| 280 .. | 18 | ez datorrenaz. . | datorrenaz. |
| 295 .. | 20 | vorondadetic . . | vorondatetic. |
| 305 .. | 10 | consueloa . . . | consueloa. |
| 374 .. | 22 | dezu. . . . . | dezun. |
| 378 .. | 17 | ezta . . . . . | ezda. |
| 394 .. | 8 | videtit . . . . | videtic. |
| [illegible]3 .. | 9 | batetic . . . . | betetic. |
| [illegible]4 .. | 15 | gustoco. . . . | gusto. |

errengloy stands for Castilian renglon by the ordinary Baskish rule of euphony.

p. 313, line 2 from the foot the nominatives of _du_ must be _iliitciaq_, _utatcic_, _apartatciac_ to be grammatical.

